

Liburu honetan, 121 pertsonak 121 diskori buruz idatzitako testuak bildu ditugu. Gustuko dituztelako, bizitzako uneren batean haientzat garrantzitsu izan direlako, adierazi nahi duten hori esateko baliagarri zaizkielako aukeratu dituzte diskoak. Hainbat sasoi, estilo, herrialdetako diskoak. Testuak ere askotarikoak dira: pertsonalak, deskriptiboak, politikoak, fikziozkoak, errealak, musika kritikak, poemak, memoriak, ipuinak, azalekoak, sakonak. 121 pertsona 121 buru dira, eta nork bere moduan erantzun dio disko bati buruz idazteko egin genion proposamenari. Testuetako asko irakurtzen zuk ere guk bezainbeste gozatzea espero dugu, irakurle.

— KAFEA ETA GALLETAK

*Lehenengo edizioa, 600 ale. 2012ko iraila.*

**Kafe aleak. 121 disko irakurketa / Kafea eta galletak**
**Egitasmoa**. Kafea eta galletak — **Argitaletxea**. Kafe arrastoak — **Helbidea**. Astra (Gernika-Lumo)
ISBN. 84-615-9960-8.
LG. BI-1529-2012

kafeaetagalletak@gmail.com
www.kafeaetagalletak.net

**Testuen egileak**. Testu bakoitzaren amaieran zehaztuak.
**Irudien egileak**. Atal berezian zehaztuak.
**Koordinazioa**. Ibon Rodríguez García, Leire Lopez Ziluaga.
**Itzulpenak, zuzenketa eta edizioa**. Ibon Rodríguez García, Leire Lopez Ziluaga.
**Itzulpen-zuzenketa laguntzaileak**. Gorka Erostarbe, Borja Goñi, Edorta Matauko.

**Maketazioa eta azala**. Ana C. Cano Martín.
www.anacarlotacano.es



Liburu honen edizio digitala eskuragai "www.kafeaetagalletak.net" gunean.
Baita gaztelaniazko bertsioa ere.

2008ko azaroan sortu genuen Kafea eta galletak. Diskoak elkarrekin entzun eta sortzen ziguten lilura partekatu nahi genuen. Telefonoz, internet bidez, autoan gindoazela egiten genuena egitea zen asmoa, hau da, entzundako diskoei buruz eta musikaz hitz egin, baina diskoak leku publikoan eta bolumen onean entzunda, elkarrekin eta musika lehenengo planoan jarriz. Ezagutzen ez genituen diskoak lehen aldiz entzun, eta maite genituenak entzuteko aukera eman. Ikasten jarraitu.

Diskoak guk geuk proposatzea zen hasierako asmoa, eta urte hartako azaroaren 1eko lehen saiorako geuk aukeratu genuen Slinten “Spiderland”. Zerbait berezia egin nahi genuen, eta Xabier Montoiari proposatu genion entzunaldiaren ondoren kontzertua egiteko. Hain gustura egon ginenez, ordutik aurrera formatu horrekin jarraitzea erabaki genuen. Bigarren saiotik aurrera, musika taldeek aukeratu dute diskoa, eta kontzertua egin dute entzunaldiaren ostean.

Egun batean formatu horren mugez hitz egiten hasi ginen. Kafea eta galletaken saioetan taldeek baino ez dute diskoa aukeratzeko beta, eta gogo handia genuen bestelako jendearekin ere zerbait egiteko: saioetara etorri direnak, kontzertuetatik ezagutzen ditugunak, gustatzen zaizkigun gauzak egiten dituzten pertsonak. Liburu bat egitea pentsatu genuen, buruan genituen pertsona horietako asko biltzeko. Esku artean duzun liburua, hain zuzen ere.

Parte hartzea nahiko genukeen pertsonen zerrenda luzea egin, eta mezuak idazten hasi ginen. Hauxe izan zen eskatu geniena eta, beraz, liburuan aurkituko duzuna: disko bat aukeratu, eta hari buruzko testu bat idazteko; nahi zuten ikuspegitik idazteko esan genien: musikala, pertsonala, politikoa, dena batera. Egin zezatela nahi zutena, karaktere kopuru baten barruan. Badakigu horrek kohesioa kentzen diola liburuari, badakigu irakurle guztiei ez zaizkiela testu guztiak gustatuko, ez zaizkiela disko guztiak gustatuko, baina gure asmoa estimatzen dugun jendea biltzea izan da hasieratik, eta ez liburu instituzionalizatu serio bat egitea.

Zerrenda luze hartako 121 pertsonaren testuak irakurriko dituzu liburu honetan. Ez daude hasieran egin genuen zerrendako guztiak, hainbat arrazoi tarteko. Bada min handia egin digun kontu bat. Emakumeak % 25 bat baino ez dira liburuan. Inguruotan ez gara asko musikaz idazten dugun emakumeak, eta orain arte idatzi ez duten emakume askori proposatu diegu liburuan parte hartzeko. Liburuan parte hartu duten emakumeen eta musikaz idazten dutenen kopurua ez da batere errealista. Kafea eta galletaken publiko gehiena emakumezkoa da, joaten garen gainerako kontzertuetako ia erdiak ere. Baina musika taldeetan, testugintzan, diskoetxeen kudeaketan, disko-dendetan eta abar emakumeek gutxiengo izaten jarraitzen dute gurean. Zer esanik ez ikuspegi feministarekin lan egiten duten pertsonek. Baina idazteko proposamenek ez dute izan guk nahiko genukeen arrakasta, eta emakumeen ezezko gehiago jaso ditugu gizonena baino. Eraldaketa feministak izan beharko luke musikaren arloan gabiltzanon erronka nagusia.

Baina orain parte hartu duten pertsonei erreparatu nahi diegu. Liburuan dauden pertsona guztiak miresten ditugu gauza batengatik edo bestearengatik. Oso

pozik gaude hona bildu nahi izan dutelako, eta eskerrak eman nahi dizkiegu bihotz-bihotzez. Musikak eman digun gauzarik onena bidean egin ditugun lagunak dira.

Liburuko 121 testuak diskoen argitalpen daten arabera antolatu ditugu. Testu bakoitzaren amaieran autorearen izena eta jatorria duzu, baita gurekin edota musikarekin lotzen duen ezaugarria. Ez dago musikaririk idazleen artean, musikazaleak dira guztiak. Testu bakoitzaren bukaeran, idazleak kultur jardueraren batekin duen harremana jarri dugu, ezagutzen ez duen irakurleak koka dezan. Bestelako arloren batean jarduten badu, musikazalea jarri dugu, baina argi utzi nahi dugu elektrizista, kimikari nahiz antzerkigile izan, musikazaletasunak batzen dituela denak.

Nahiz eta behean sinatzen dugun bi pertsonak izan liburuaren lana gure gain hartu duguzo zorra ken dezakegula.

Ana Carlota Canok bere bizkarrean hartu du liburu osoaren eta azalaren maketazioa eta diseinua. Testuek oinarri dituzten diskoen bertsio marraztuak Jon Martinek, Alots Arregik eta Joseba Agirrezabalagak papereratu dituzte, propio libururako. Testuak orrazten ileapaintzaile bikainak izan dira Gorka Erostarbe eta Borja Goñi, estiloa finkatzeko laguntza handia eman digutenak. Eta itzulpen batzuk egin ditu Edorta Mataukok. Proiektu honekin izan duten inplikazioa erabatekoa izan da.

Eta ez ditugu aipatu gabe utzi nahi zenbait testu ilustratzeko munduko hainbat txokotatik coplyleft lizentziapean irudiak libreki erabiltzeko aukera eman diguten argazkilariak (liburuaren amaieran daude zehaztuta). Copyleft filosofiarekin bat egiten dugulako, soilik lizentzia hori zuten argazkiak bilatu eta eskatu ditugu. Halaber, gure liburu hau, eta biltzen dituen testu eta irudi guztiak, CC-BY-SA aterkiaren azpian daude. Beraz, libreki zabal ditzakezue liburuko eduki guztiak, betiere, egilea aitortuz eta, edukia partekatu edo eraldatu nahi izanez gero, lizentzia berberarekin publikatuz.

Gainontzean, liburua posible egin duten idazle, aurrerosle eta banatzaileei ere besarkada beroa eta gure esker ona.

**IBON RODRÍGUEZ GARCÍA ETA LEIRE LOPEZ ZILUAGA**

[ 01 ]

## **BO DIDDLEY** | BO DIDDLEY



Chess Records, 1958

Nire disko bilduman badira, gogora ekartzen dizkidaten une apartak direla eta, arras maite ditudan harribitxi asko. Nire LP gogokoena aukeratzeko orduan, zentzu guztietan gehien asebetetzen nauenaren alde egin dut. Gainera, musikaren historiako ibilbide artistikorik bikainenetako bat duen artista batena da, rockaren historialari gehienen esker ona izan ez duena eta itzalean geratu dena.

Oso txikia nintzenetik musikarekiko atxikimendu handia sentitu izan dut, musika beltzarekiko, batez ere. Uste dut gure aitaren gustu musikalak eragina izan zuela, John Lee Hookerren mireslea baita. Horri guztiari gehitzen badiot 40ko edo 60ko hamarkadetako erritmo primitibo, basati eta alaiekiko dudan grina bizia, soin eta hezur dantzan jartzen bainaute, nire aukera, zalantzarik gabe, benetako rock'n'roll erregea da, Bo Diddley imitaezina, eta *Bo Diddley* izeneko diskoa.

LPa 58. urtekoa da. Chess Records zigilu entzutetsuan –nire gogokoenetako bat– grabatua izan zen, eta bluesetik rock'n'rollerako trantsizioaren errudunetako bat izan omen zen. Kantu klasikoak biltzen ditu diskoak, lagun onez eta musikari bikainez inguratuta grabatu zituen Bo Diddleyk: abestuz eta harmonika joaz lagundu zuen Billy Boy Arnoldek, pianoan Otis Spann, Jerome Green aparta marakekin (berari eskaini zion Bok *Bring It To Jerome* kantutzarra), Frank Kirklandek jo zuen bateria eta haiekin batera Lester Davenport harmonika jotzailea aritu zen. Giro ona islatzen da ordu erdi baino gutxiago irauten hamabi kantu laburretan. *I'm a Man* eta *Bo Diddley* kantu klasikoetan ahots lazgarriz astintzen gaitu, hildakoak ere hilobitik aterako lituzkeen erritmo basatiz. *Black Beat* entzun nuen lehenengo aldian hain frenetikoa iruditu zitzaidan, non New Orleanseko piano boogie batek egingo lukeen bezala katigatu baininduen.

Gitarra laukia hartuta, Big B-k “Bo Diddley erritmoa” oparitu zigun, musikaren historiako hamaika talderi eragin diona eta belaunaldi askok bertsionatu dutena. Jarraitzaileen zerrenda amaigabea osa dezaket: The Rolling Stones, The Yardbirds, The Kinks, The Who, Buddy Holly, Ramones edota The Pretty Things, izena Boren *Pretty Thing* kantu zoragarritik atera zutenak.

Bere buruari jarri zion izen artistikoa da Bo Diddley; Afrikako gitarra baten izena da. 1928an jaio zen Mississippiko herrixka batean, Ellas Bates izenez. Chicagoko kaleetan hazi zen, haizearen hirian, bluesaren sorlekua hasieran eta rhythm'n'bluesarena geroago. Beti entzun izan dut musikarako berezko talentu handia zuela, eta berak sortu zuela zuriak eta beltzak dantzan jarriko zituen erritmo bereziena eta bereizgarriena, arraza diskriminazioa estatubatuar nazioaren egunerokoa zen garaian.

Izugarri gustatzen zait disko hau entzutea, ildo bakoitzak abestiak zuzenean grabatzen ziren garaia gordetzen baitu, energia guztia eta lagunartean grabatzeko egiten zen ahalegina transmititzea lortzen zutenekoa. Gitarra bat, ahots basati bat, koru soil batzuk, danbor bat eta marakatxo itzel batzuk nahikoak ziren rock'n'rollik originalena eta dibertigarriena egiteko. Kantuok luzaroan iraun eta iraungo dute, jendea mugiaraziko dute eta, Chuck Berry edo Little Richarden mailako arrakasta inoiz lortu ez bazuen ere, nik beti aldarrikatuko dut Bo dela rock n'rollaren benetako erregea!!

Berak zioen bezala: "erritmoa, erritmo hutsa zainetan zehar"... ezbairik gabe, erabat ados nago, zoratu egiten nau!!

Musika bilduma on guztietan beharko lukete bere diskoek. 2008ra arte, hil zen urtera arte, aritu zen zuzenean jotzen, eta jada ez da berea bezalako soinurik izango... Bizi dadila beti gugan *The Originator*!!!!!

**BEATRIZ PINTO, DJ CHULINA.** GIJON (ASTURIAS), 1980
Musika jartzailea
myspace.com/artchulina

[ 02 ]

## THE DANCE OF DEATH & OTHER PLANTATION FAVORITES | JOHN FAHEY



Takoma, 1964

**DANTZA! EGIN DANTZA, MADARIKATU ALAENAK!**
Dantza! Egin dantza, madarikatu alaenak!
Dantza, hil ez zaitezen, dantza hil artean.
Hebaindutako soinuren baten tekla noragabeak arituko dira zuen dantzak benazkoagoa eman dezan, halere patetiko jarraituko duen arren.

Egin dantza, zuek, madarikatuak!
Hil edo bizikoa bailitzan, izan ere, horrela baita,
eta bizia galdutakoan, elkarri so, zein pauso erratu zenuten galdezkatuko duzue.

Egin dantza! Besterik ezin duzue egin eta!

Dantza! Egin dantza, madarikatu alaenak!
Bizitza horretan datza eta,
salto, bira eta irri egin, besoak jaso eta atsekabea askai bihurtu,
ardo gozoa edan eta zain egon, kanpotar batek gau bakarra igarotzeko
aterpearen truke kondaira bihur zaitzan.

Egin dantza, zuek, madarikatuak!
Ez baitago begiak jango dizkizuen belerik, ezta irentsiko zaituzten sugerik ere.

Dantzatu! Eta egin ulu gauean!
Piztu etengabe suak eta erre esaera zaharrak.

Musika egon bitartean, dantza!

Dantza! Egin dantza, madarikatu alaenak!
Heriotzara heldu aurretik bizi beharreko zoritxarra baitaukazue.

**IZARNE OIARZABAL SANTISO.** ONDARROA, 1987
Musikazalea

[ 03 ]



## SAM COOKE WITH THE SOUL STIRRERS
SAM COOKE WITH THE SOUL STIRRERS

Specialty, 1964

Esan gabe doa, erabateko ergonomiaz uztar daitezke agnostizismoa eta erlijioa. Ateismorik puntakoena ere ebanjelizatzailea izan daiteke. Artearekiko sentikortasun apur bat duen oro aho bete hortz geratuko da, esaterako, Vatikanoko San Pedron, argazkia egingo du Leoneko katedralaren ondoan edo turismo erlijiosoari emango dio oporretako zati bat. Soilik astakirten atzeratu eta ez-praktikante batek, arrazoi horiengatik, ez luke lilurarik sentituko gerora historiako soul abeslaririk inportanteena bihurtuko zenarentzat irakasgai izan zen diskoaren aurrean. Marvin Gaye eta Otis Redding ere igoko ziren tronu horretara, eta patuak hiruron heriotza goiztiar eta tragikoekin triangelu bat osatu zuen.

Bere lana autoekoiztu zuen lehenengo artistetako bat izan zen, eta horrela negozioaren bi planoetan kokatu zen –gaur egun, guretzat, kontu arrunta da hau–. Modu bikainean uztartu zituen bi planoak eta dirua irabazi zuen, batez ere, musika zuriei salduz. Ondoren etorriko zen merkantilizazioak (*You Send Me* kanta da horren erakusgarri) eta zerrendetan lortutako lehenengo postuek ez lukete lausotu beharko ministro protestante baten semearen zintzotasuna –eta sua–. Mississippi aldeko Clarkdalen jaioa, baina Chicagon hazia, bere doinuekin gutariko asko (birtualki izan bazen ere) kristautasunera bihurtu gintuen lehendabizikoz entzutean. Bere ahotsak, belaunikarazten gaituen aldare horrek, 1950ean Soul Stirrers taldean sartzera eraman zuen –orduan RH Harris zen taldearen gidaria– eta *Touch the Hem of His Garment* bezalako kantuak grabatu zituen, non fraseatzeak eta *backbeat*-ak zazpigarren zerura eramaten gaituzten. Hemeretzi urte besterik ez zuen eta *How Far Am I from Canaan* kantuaren edertasuna adin horren duinekoa da, xahutasunagatik, pasioagatik eta bere erabateko biluztasunagatik. Bost

hamarkada geroago Specialty zigiluak berriro argitaratu zuen, hamar kantu gehiagorekin –25 guztira–, *Peace in the Valley* abestiarekin hasten den disko hau, gospelarekin harremanik izan ez zutenentzat bataioa eta soulerako zubia eraikitzeko materiala izan zena. Gerora etorriko zenak beste atal bat mereziko luke.

**ÁLVARO FIERRO.** BILBO, 1978
Musika kazetaria

[ 04 ]

## **A LOVE SUPREME** | JOHN COLTRANE



Impulse!, 1965

*God will wash away all our tears...*
*He always has...*
*He always will.*

*John Coltrane*

Ez da beti gertatzen.
Baina gehienetan bai. Askotan.

Disko hori entzuteak batzuetan sortzen dion zirrara berezi hori sentitzea, behin baino gehiagotan nahita bilatu eta noizean behin aurkitzen duena.

Orain ere (kaleko atea krisketaz itxi eta etxera sartzean) horixe nahi du sentitu lehenbailehen, premiaz, eta ez kaletik dakarren ezinegona.

Egongela zeharkatu duelarik, takoidun zapatak erantzi ditu. Sukaldean alkohol hondar bat ixuri du edalontzian, izotzik gabe, eta larruzko minigona beltzaren elastikoa laxatu duen bitartean lehenengo tragoa edan du antsiaz.

Bareago, errezelak jaitsi ditu etxea ilunpe leunean utzi arte. Besaulki zaharrean eseri da eta diskoa martxan jarri du. Gorriz margotutako ezpainetan duen zigarreta piztu eta gero, ke bafada luzea plazerez botatzearekin batera entzun ditu sarrerako lehenbiziko notak deiadarka, ezustean, txoriak bezala airean supituki hegaldatzen.

Kontrabaxuak, pianoak eta bateriak lagunduta, erritmo lasai eta errepikakor bat marraztu du soseguz eta, besaulkian barrena murgilduz, haien atzetik irristatzen utzi du bere burua. Saxoa bere bekatuak oihuka aitortzen hasi denean, hitz egokienen bila arituko balitz bezala dela pentsatu du, bera bezain zalantzati dirudiela. Soloak jarraitu dio segidan zerbait harrapatu nahian, ideia bat edo agian erantzun bat, bide desberdinak saiatuz darabilen hizkuntza etengabe birsortzen. Uneka dena da norabide aldaketa eta segurtasun eza, gero, sortutako korapilotik ezbairik gabe askatu eta aurrera jarraitzeko jario geldiezinean. Tarteka trabaturik gelditituko dela dirudien arren irteera bat aurkitzen du beti.

Berak ere badaki irteera bat bilatu beharko lukeela, baina beldurra beruna baino pisutsuago nabaritu du barruan, eta oinak kateatu dizkio. Edo beharbada biziraute sena da ihes egiten uzten ez diona, nork daki. Edonola, horrela ezindurik ibiliko ez dituen bide berriak irudikatzea alferrikakoa dela aitortu dio bere buruari, atsekabez baina soberako gupidarik gabe. Keinu bakar batez hustu du edalontzia.

Pixkanaka, erritmoa geldotzen joan da berriz, eta giroa lasaitzen. Lau musikariek zerbait atzeman dutela dirudi, ideia baten inguruan atseden hartuz bezala, eta beraiekin batera erlaxatzen doala sentitu du. Ahotsek *("...a love supreme...a love supreme...")* errepikapen zirkular goxo batera eraman dute. Sakonak eta hipnotikoak dira, baina apalak, eta hezi gabeak ere bai. Baxua bakarrik gelditu da ideia horrekin jolasean, indarra hartzen joan da, gero guztien artean egingo duten eztandarako prestatuz. Abiatu dira eta saxoak hegaz bezala kendu du zikinkeria gainetik, sakon eta indartsu arnastuz, oihu egiteak garbitzen gaituen bezala. Garbitasun berbera desiratzen du bere bizitzarako, nekatuta dago lan egiten duenean nazka sentitzeaz, zikinkeria burutik ezin kentzeaz... Pianoak bitartean kristalezko notak marraztu ditu segurtasunez dantzatuz, jostari eta alai, gero indar obsesiboz saxoari berriz pausu emateko honek bere bilaketa jarrai dezan, galdu eta bidea eginez, euforiaz oihuka, berriz lasaituz erantzuna aurkitu ondorengo neke atseginean murgildurik.

Atseden labur bat eta bateriak gela guztia bete du, kaiolaturiko piztiaren ezinegonaz. Laukotea indarrez bueltatu da segidan, zerbaiten irrikaz, larriki desiratzen duten horren atzetik presaka, aldaketa, konponbide, irteera baten atzetik. Berak, ordea, ez du ezer aldatuko denik uste, ez du konponbiderik ikusten, ezta irteerarik topatzen ere. Obsesiboki ekarri ditu gogora lehenengo *lantxoa* egin zueneko nazka eta goragalea, *bezeroaren* aurpegi larria, bukaerako intziri animalia. Bakarrik gelditzean egin zuen bota-aldi luzea.

Gaurkoan ez du botaka egin. Ohiturak eraman du goragalea, baina higuinak hor dirau fideltasun nekagarriz, eta horretatik ezkutatzeko ahaleginean gogo biziz murgildu da musikaren baitan. Pianoak arinki inguratu ditu zailtasunak, dotoreziaz egin du aurrerantz saxoa berriz jokoan sartu arte, askatasunez eta euforiaz aurrerantz ihesi berak egin nahiko lukeen modura.

Azkenean helmugaren batera iritsi direla ematen du. Abiadura geldotu eta atseden hartu dute, urtuz bezala isilduz joan dira eta bateriak eztanda batean barrenak hustu ditu uholdeka. Negar egiteko gai zeneko garaiak gogoratzen ditu oraindik, baina bizitzak aspaldi garbitu dizkio malkoak aurpegitik. Kontrabaxuaren itzulipurdi eroei jarraitu die, gero seriotu eta edertasunarekin jolasean nola aritzen den entzunez, ezkutaketan bezala.

Azkenengo atala otoitz baten antzera hasi da, poliki. Konklusio bat da, egindako bidearen ederrari begirada lasai bat luzatzea. Begiak itxita, diskoaren bukaerak zigarretak botatzen duen kearen kurba eta espiral motelak gogorarazi dizkio. Norbait erailtzeko enkargua betetzen duen bakoitzean bezala dela pentsatu du emeki itzaltzen diren azkenengo notak entzutearekin batera, tiro egin ostean pistolaren aho beltzetik irteten den kea bezain bihurria dela.

* John Coltranek (saxo tenorea), McCoy Tynerrek (pianoa), Jimmy Garrisonek (kontrabaxua) eta Elvin Jonesek (bateria) 1964ko abenduaren 9an grabatu zuten *A Love Supreme* izeneko diskoa Rudy Van Gelderen New Jerseyko estudioan, laukotearen momenturik gorenean, askoren iritziz Coltranek inoiz jo eta konposatu duen musikarik ederrena erregistratuz.

**ANDER BARRIUSO.** EIBAR, 1976
Soinu teknikaria

[ 05 ]

## OS AFRO-SAMBAS DE BADEN E VINICIUS
BADEN POWELL E VINICIUS DE MORAES



Forma, 1966

Zaila zait azaltzea zergatik aukeratu eta aurkezten dizuedan *Os Afro-sambas* gustatzen zaizkidan disko guztien artetik. Atentzioa eman zidan beste garai eta leku batera eramaten nauelako: lagun batzuk elkartu ziren orduan, musikari esker eta bizitza ulertzeko modu berberari esker, eguneroko dibertsioa eta parranda nagusi, txankletetan edo nahierara ibiliz, baina betiere uneaz gozatuz.

Musika entzuten dugunean joera handia dugu gehiegi aletzeko, abesti bakoitzaren egitura aztertzen dugu, hitzen *kalitatea*; horrexegatik jartzen ditugu etiketak, oso ezaugarri subjektiboetan oinarritu arren. Musika brasildarra inauterietako erritmoekin lotua izan da beti, batukada, txilibitua eta beste ezer gutxirekin. Mundu osora zabaldu zuena, ordea, bossa nova izan zen, ia beti Vinicius de Moraesek zuzendutako musikariekin. Viniciusek, inguruan musikari onenak izateaz gain, lehen aipatu dudan eta bere kantuetan aldarrikatzen duen askatasuna islatzen du, baita disko honetako kantuetan ere.

Bossa nova antologiarik onentzat jo izan den *La fusa* bildumari esker ezagutu nuen *Os Afro-sambas* diskoko abestietako bat. Alaitasuna eta giro ona islatzen zuten kantu horien artean entzun nuen *Canto de Osana*. Horixe izan zen haritik tiratzera eraman ninduen amua. Orduan sakontzea erabaki nuen (ez da komenigarria gogoa irenstea) eta CDa enkargatu behar izan nuen, ez baitzen oso erraza lortzen.

Diskoak Afrika dakarkigu gogora. Baden Powellek halaxe berretsi zuen bere musikaz hitz egitean. Afrikak inspiratu zuen, bertan baitago sanbaren jatorria, baita bere hitzetan sarritan ageri den Umbanda erlijio afrobrasildarrarena ere. Entzutearen poderioz (eta itzultzaile automatikoaren laguntza aitortuz) filosofia hori zertan den irudikatu ahal izan dut: norberak ez daki zer den edo zer izango den, bakarrik daki zer izan zen, eta horretaz ere ezin da ziur egon.

Jakina, badago diskoaz gozatzerik alde mistikoari jaramonik egin gabe; portugesa jakin gabe zenbait esaldi ulertzeko modukoak dira. Dibertigarria da kantatzea, doinua hobetzen ahalegintzea... azken batean denok murduskatzen dugu ingelesa, hein batean, entzun izan ditugun kantuei esker.

Abesti guztien pisua Baden Powellen (bai, boy scouten fundatzailearen izen berbera du) gitarrak darama. Abestiei giro enigmatikoa ematen die eta zatien arteko trantsizioak bere burura datozkion bezalaxe jotzen ditu. Ematen du gitarrak inguruan dauden perkusio jotzaile guztiak zoratu behar dituela. Baden basapiztia da gitarrarekin, soinuak gainjartzen dira eta, zenbaitetan, instrumentu gehiegi dagoela dirudien arren, azkenean *zalaparta* horri zentzua ematea lortzen du. Instrumentu horien guztien artean berimbau izenekoa dago; soinu huts eta dardarkariko tresna da. Lemanjá, Xango eta abarri kantatzeko ukitu etnikorik egokiena ematen die.

Disko honetan Em Cy laukoteko lau ahizpek ere abesten dute; nire ustez, Rio de Janeiroko kafeetako batean ezagutuko zituen Viniciusek, horrelakoetan jo ohi zuten eta. Haien ekarpena ez da koruetara mugatzen: kanta batzuetan leloa eurek abesten dute, eta beste batzuetan Viniciusi erantzuten diote, musika afrikarrean egin ohi den gisan. Nolanahi ere, diskoaren ideia ez zatekeen berbera haiek gabe.

Edizio honen soinu kalitatea erdipurdikoa da, baina 90eko hamarkadan Baden Powellek ia kanta guztiak grabatu zituen berriro, Vinicius gabe. Ez da hain autentikoa, jakina. Autentikoena litzateke garai hartan egon izana Vinicius eta Badenekin hondartzako saio inprobisaturen batean, jaima eta chill-outetako *modernoen* posetik urrun. Jotzea eta gozatzea. Besterik behar al da?

Saravá!

**JON ANDONI IZURIETA.** PORTUGALETE, 1975.
Musikazalea

[ 06 ]

## **PET SOUNDS** | THE BEACH BOYS



Capitol, 1966

### ANIMALIEN SOINUAK

*Pet Sounds* (The Beach Boys, 1966) diskoa, eta bereziki, *I Just Wasn't Made for These Times* kantua entzun bitartean idatzitako pasarteak.

### INOZOA

Txundigarriak dira Brian Wilson Beach Boys taldeko abeslariak hondamen mentaleko hamarkaden ondoren ahopean esandako hitzok: "Uste dut poparen garaia iragana dela. Izan ere, nor izango da gai gu liluratzeko Phil Spectorrek egin zuen bezala?... Musikak pot egin du. Inozotasunarenak egin du".

Brian Wilson, poparen ikonoa-aitzindaria-biktima, eta bere musikarekin jendeari negarra eragiteko gaitasun bitxia duena, erotuta dago eta horrelako atrebentziak esateko ausardia du. Tira, atrebentziak baino, argitasunezko txinpartak, oporren zati handi bat txundidura eta lobotomiaren artean ematen duen buru baten txinpartak.

Ez da hau poperako garaia; ezta inozotasunerako ere. Kontua da gaur egungo popak zerikusi gutxi duela eguzkiak beti argitzen zuen Kalifornia hartan Wilson anaiek, lehengusu batek eta lagunak jotzen zutenarekin. Gaur egungo musika hainbat gauza izan daiteke –azidoa, dotorea, perfektua–, baina sekula ez inozoa.

Aldiz, pop musikak, duela berrogei urte jaio zenean, ezin gardenago eta ezin argiago, inozotasuna gordetzen zuen. Orain badago jolasten denik mundua Shirelles taldearen *Baby, It's You* kantuaren leloaren erdian pausatu dela sinestera, eta horri popa esaten zaio. Baina hori ez da pop musika. Hori beste edozein gauza da: simulakro *revival*-zale bat, nostalgiazko itxurakeria, imitazio faltsu bat... baina inolaz ere popa.

Hortaz, "jendea maitatua sentiaraziko zuen musika" jo nahi zuela aldarrikatzen zuen hark, begiak pixka bat zabaldu eta laburzirkuitatutako neuronen nahaspila baten artetik egunaren argia bezain garden ikusten du dena: hemen inozotasunak ez du lekurik, ilusio hutsa da. Inozotasunari tximeletaren hegalei bezala gertatzen zaie, hurbildu, ukitu eta tximeletarik ez dago. Orain gutxi arte bai, hiru minutuko kantu bikainetan bildu ahal zen; orain, ezta hori ere.

Munduan inozotasuna izan ala ez izan, beti dago jendea, gutxi, errealitatearen eraginik ez duena. Miraria. *I Just Wasn't Made for These Times* (Ez nintzen garai hauetarako jaioa izan) abesten zuen Brian Wilsonek, esaterako. Inozoegia eta popegia.[1]

[1] Ez naiz erantzutera ausartzen. Nolanahi ere, ederra litzateke testua berrirakurtzea hamar urte barru eta nire buruarekin erabateko desadostasuna agertzea. Horrek esan nahiko luke posible dela beste bat izatea, etengabe erratzeari esker bada ere.

**NOSTALGIKOA**

Goiko testua *Gara* egunkariko *Mugalari* gehigarrian argitaratu zen 2002ko urrian. Hamar urte geroago berriro irakurri dut testua. Ez zait gustatu tonua, argudioa ere ez. Neure burua ere ez. Honako hau dio testuak: dagoeneko ezinezkoa da popa egitea popa inozoa delako, eta inozotasuna ezinezkoa da orain (2002ko *orain* hartan), ez zen hala Brian Wilsonek kantuak idazten zituenean, bakarrik eta lekuz kanpo sentitzen zenean.

**ATENPORALA ETA DESEGOKIA**

Argudioaren ahula, ezagunegia zaidan tonu sutsuz eta nostalgikoz erabilia, akats tipiko batetik datorkio: kontu objektibo bat –popa zer den– eragin subjektiboekin –popak nigan sortzen dituen sentipen eta sentsazioak– nahastea. Horrekin jarraituz, inozoa al da berez popa? nostalgikoa al da popa? Jarraitzen dut *I Just Wasn't Made for These Times* entzuten. Ez dut kontzentratzerik lortzen: ahots-polifonia finen urregintzak nagoen tokitik erauzi eta pop musikaren linbora eraman nau. Abestiz aldatu dut, argudio berria eraikitzeko asmoz (neure artean bederatzi urte barru eutsiko ote diodan galdetzen dudan bitartean). Gauza bera gertatzen zait: melodia berriak pop musikaren linbora narama berriro.

Bigarren kantu hori *Posponías* da. *Monologo interior* diskoko kantu bat da. Single taldearen kantu hori duela zenbait hilabete agertu zitzaidan eta zalantza eragin zidan, zein disko aukeratuko ote nukeen testu honetarako. Mail baten bitartez heldu zitzaidan larunbat goiz batean. Aurreko gauean ez dakit zertan, inaugurazio batean edo kontzertu batean, topatu nuen lagun batek bidali zidan. Bertan betiko esaldiak esan genizkion elkarri: "Aspaldiko!", "Zerbait hartuko al dugu?", "Bai, ez. Orain ezin dut", "Bai, hobe ez. Neu ere oso estu nabil".

*Posponías* eta *I Just Wasn't Made for These Times* kantuek istorio ezberdinak kontatzen dituzte (hitza eman eta hitza jaten duen munduko gizon bat; desira duen nerabe bat, baina munduak asebetetzen ez duena). Bestelako garaiez ari dira, heldu ez direnak eta helduko ez direnak, eta sentipen berbera deskribatzen dute, tokatu zaien garaiari egokitzen ez den subjektuarena. Hiru minutuz, bi kantuok pop musikaren burbuilan murgiltzen dute entzulea. Ez da nostalgikoa, ezta inozoa ere, entzulearen ezinegon existentziala baretzeko gaitasun bitxia du, eta ez dio jaramonik egiten denboraren iragaiteari.

**MIREN JAIO.** BERMEO, 1968.
Arte kritikaria
bulegoa.org

[ 07 ]



## **BLONDE ON BLONDE** | BOB DYLAN

Columbia, 1966

*Y crecí tratando en vano de desentrañar*
*todo lo que el miedo esconde*
*y yo me hundía en el 'Blonde on Blonde'*
*haciendo que los días me duraran mucho más,*
*mucho más, lo juro, mucho más.*
Nacho Vegas

### HARMONIKAREN ERABILERA EGOKIA

Ezeretik bat-batean sortua, arpegio hura, harmonika hura, doinu hura… Bob Dylan, *Blonde on Blonde* diskoko azken kantua. *Sad Eyed Lady of the Lowlands.* Zenbat denbora entzun gabe! Zenbat oroitzapen nahasian! Zenbateko tristura eta zenbateko indarra, dena batera. Zenbateko bizi-txertoa zainetan!

Ohetik altxatu eta autokarabanatik kanpora irten nintzen, kantua hobeto entzuteko gogoak bultzatuta. Bertan behera utzia nuen siesta egiteko asmoa, *de facto*, erabakirik gabe, barruko ahotsen inolako agindurik edo eztabaidarik gabe.

Aldameneko autokarabanatik zetorren kantua. Arropa zabaltzen ari zen andrea, bainujantziaren gainean brusa txuri arina jantzita. Harengana hurreratu nintzen, kantuak sorgindutako automata bat banintz bezala.

– Barkatu –atera zitzaidan barrutik, neu ere harritu ninduen ziurtasunez–. Baduzu zigarro bat? Ez dut erretzen baina, aizu, kantu honekin… Hainbeste urte dira entzuten ez dudala!

Zigarroa emateaz gain, arropa guztiak zabaldu eta gero bere autokarabanaren atarian kafe bat hatzera gonbidatu ninduen, *Blonde on Blonde* entzuten genuen bitartean.

Horrela ezagutu nuen Marta, abuztuko egun sargoritsu batean, Mendigorriako kanpinean. Nire adin berekoa zen, eta gaztetan antzeko musika entzuna: Bob Dylan, Neil Young, Lou Reed, Janis Joplin, The Doors, Eric Clapton…

– Urte batzuetan, 14 edo 15 urte nituela, disko hau –Bob Dylanen *Blonde on Blonde* horretaz ari zen– oso disko kutuna izan nuen –aitortu zidan–. Herriko mutil batekin maitemindu beharrean, diskoaren azaleko Bob Dylanekin maitemindu nintzen.

– Eta *Sad Eyed Lady of the Lowlands* kantatzen zizula egiten zenuen amets…

– Nola dakizu hori? –esan zuen irriz.

– Oso erraza da. Nik *Blonde on Blonde*-ren azaleko Bob Dylan izatearekin egiten nuen amets, eta *Sad Eyed Lady of the Lowlands* kantatzeko eskatuko zidan neska bat aurkitzearekin.

– Harmonikarekin lagunduta?

– Jakina! Beti eramaten nuen harmonika aldean!

– Uaaa! Zoragarria! –esan zuen barre algara apal batean.

Solasarekin gustura sentitzen nintzenez, goiari eusteko asmoz, *Blonde on Blonde*-rekin neukan aspaldiko anekdota bat kontatu nion.

– Orain dela 30 bat urte, diskoa erosi nuen egunean seguru asko, Benito Lertxundik herriko areto txiki batean eman zuen kontzertu batean, lehenengo aulki-ilaran eseri nintzen, *Blonde on Blonde* binilozko LPa mantalean nuela, azalean Bob Dylanen aurpegia agerian, Benitok oholtzatik argi ikusteko moduan.

– Eta… ikusi al zuen?

– Oholtzako aulkian eseri eta berehala. Diskoari begira, honelako zerbait esan zuen orduan: “Hara! Hemen dugu-eta Bob Dylan! Hobe izango dugu berari uztea eszenategia”.

– Nola sentitu zinen une hartan?

– Zeharo lotsatuta.

– Kantaria izan nahi zenuen?

– Bai, hori zen nire ametsa.

– Eta…?

– Nahi izatea ez da nahikoa.

– Badakit, bai. Nahi izatea ez da ia ezertarako nahikoa izaten.

Autoironiaz baina samurtasunez mintzatu ginen gaztetako kantuez eta ametsez. Leonard Cohenen *Chelsea Hotel* etorri zitzaidan burura, neure buruari maiz aplikatutako esaldiak Martarentzat ere balio zuela iritzita: *“We are ugly but we have the music”*.

– Musikak ederrago sentiarazten ninduen –atera zitzaidan–. Edo, besterik gabe, sinpleago eta zintzoago esateko: guapoago.

Ez zuen asko iraun solasak. Martaren senarra eta bi alabak bizikletan egindako

txangotik itzuli ziren, eta nik gure autokarabana jo nuen. Laster izango ziren han emaztea eta semea, kanpineko piszinatik bueltan.

Ez zuen asko iraun solasak, baina edertu egin ninduela sentitu nuen.

Autokarabanan geneukan ordenagailu txikia piztu eta T. Rex taldearen *Life ‘s a Gas* bilatu nuen *YouTube*-n. Ohean etzan nintzen, sabaiari begira. *“I could have loved you girl like a planet”*, kantatu zuen Marc Bolanek, *“I could have chained your heart to a star…”.*

**JUAN LUIS ZABALA.** AZKOITIA, 1963
Idazlea eta kultura arloko kazetaria
berria.info/blogak/zabala

[ 08 ]



## **MAKE ME YOURS** | BETTYE SWAN

Money, 1967

Los Angelesko Ruth Dolphinen Money diskoetxeak Bettye Swanen (Bettye Jean Champion izenarekin Louisianan jaioa) *Make Me Yours* LPa argitaratu zuen 1967an. Hamabi abestiz osaturiko diskoa, *tempo* erdiko zein azkarrez eta balada gutxi batzuez eraikia, orduko soul eta r&b diskoetan ohikoa zen maitasuna edo desamodioa abestien argumentu-hari bihurtuta.

60ko hamarkadan egin ziren dozenaka eta dozenaka soul disko ikaragarriren artean *Make Me Yours* hau aukeratzea, eta ez beste edozein, hainbat faktoreren ondorio da. Lehena, Bettyeren ahotsaren kolorea eta indar neurtua da; bigarrenik, bere talentua, Bettyek berak konposatzen baitzituen kantatzen zituen abestietako asko; eta hirugarrenik, bere interpretatzeko modua, efektismo merkerik gabekoa, betiere, abestiaren izaerarekin bat eginez.

Dohain hauek guztiak, diskoko kantu guztietan antzematen dira, *Fall in Love With Me* dantzagarrian, *Don’t Look Back* iradokitzailean, *Don’t Wait Too Long* ikaragarrian, *I Will Not Cry* hunkigarrian, *The Heartache Is Gone* arinean, *Make Me Yours* kantuak *Hot R&B Billboard* zerrendan izan zuen arrakastan... baina, batik bat, bosgarren abestian uztartzen eta biltzen dira bertute horiek guztiak: *Don’t Take My Mind* izeneko *up tempo* kanoikada zoragarrian, hain zuzen ere, lerro hauek idazten ari denarentzako bere bizitzako soinu bandan iltzaturik gelditu zena entzun eta berehala. Izan ere, pista txikitzaile on batek izan behar dituen berezko bertuteetatik harago doa kantu hau.

Haize sekzio garbi eta fin batek, baxu lerro indartsu batek eta danborren kolpe zehatz eta suntsitzaileek ematen diote hasiera kantuari. Bettyek ahotsa efektu be-

rezirik gabe grabatu zuen (*echo*-rik edo beste trikimailurik gabe) eta gordin, bere horretan, entzuten da. Emozio handiz eta, aldi berean, emozio horri eutsiaz. Bihotz hautsi batek kantatzen du, eta entzulearen bihotza hautsiko du ere, ukabilak estuturik dagoela eta, letra tristea izanagatik, dantzatzeari utzi gabe. Kontraesankorra? Ez behintzat soularen mundu *zoro-garrian*, ohikoa izan baita pista txikitzaile askoren letrak tristeak izatea. *"You take my love, money and time / please have mersey baby / don't take my mind"*, dio erregu mindu batean Bettyek. Erabatekoa.

**XABIER SAGARDIA.** IRUÑEA, 1973
Musika kazetaria
entzun.com

[ 09 ]

## **BARBARA |** BARBARA



Impact, 1968

### BARBARA, IRAGAN MINIK GABE

– Arrastorik ere ez daukan hire bizitzako soinu banda osatzen duten doinu gehienak nork sortu ote zituen, askoren izenekin ere, antzera habil, zer demontre idatziko dun hik disko batez?

– Bo, bo, barruan zeuzkanat musika horien oihartzunak, nire izatearen parte ditun… –Halaxe nire burua eta nire beste burua, alferreko demandan.

Gogora etorriko zitzaizkidan melodiak kokatzen jakingo ote nuen zalantzak ez zuen luzaroan iraun, aspaldiko lagun ditudan soinuen artean argi nabarmentzen hasi baitzen Barbararen ahotsa.

– Ikusten? –nire buru harroxkoenak zuhurrenari– LParen azala ere gogoratzen dinat, hortxe egongo dun, egongelako armairuan, Barbara bera agertzen dun, Barbararen potreta, zuri-beltzean. Hoa bila, eta ikusiko dun.

Barbara agertzen da diskoaren azalean, bai, eta diskoaren izena ere horixe da, *Barbara*, horrela, biluzik. Bilduma bat izan arren –1964-1968 bitartean grabatu zituen diskoetako kanten aukera bat–, Impact etxekoek *le meilleur de…, greatest hits…* edo tankera horretakorik ez jartzeko sentiberatasuna izan zuten. Barbara aurrez aurre, haren soako sakona azalean, haren ahots zirraragarria biniloan.

Noiz entzun nuen lehen aldiz? Ideiarik ere ez. Dakidana da hogeita gutxi nituen garaitik datozkidala haren aurreneko oihartzunak, gerora Barbararen kantuek hainbatetan sorrarazi didaten zirrara –fisikoa– horrekin batera. Eta badakit, baita ere, ahotsak baduela horretan zeresanik, jakina, baina ez da Barbararen ahotsa

gehien erakartzen nauena (maiz laztandu edo aztoratu banau ere). Ez eta haren kantatzeko modua (hain gustukoa dudana), ez eta kantuek diotena ere. Horren guztiaren batuketa da liluratzen nauena, dosi egokitan nahastutako elementu askoren emaitza.

– Gogoan dun *Mes hommes* kantua? *"…Ils marchent le regard fier, mes hommes, Moi devant, et eux derrière, mes hommes…"*.

– Eta hik, gogoratzen al dun nola kantatzen zuen? Ahots gozoaz, probokazio eta harrotasun neurtuaz… Ez, garai haietan, gure musika erreferentzia gertuenetan, emakumeek ez zitiztenan taula gainean horrelakoak horrela kantatzen –behingoagatik, adostasuna erabatekoa da nire buru barruan–. Guretzat berria zunan Barbara, iradokitzailea, erakargarria, oso.

Harrezkeroztik, ez dugu harremana galdu, nire soinu bandaren parte bilakatu da Barbara. Ez da egunerokoa, baina lantzean-lantzean entzun ohi dut, eta beti zait erakargarri, egun ere lagun ditudan adiskide zaharrekin egotea gustagarri zaidan bezalaxe.

Gure harreman horretan badaude iraganeko oihartzunak –hark ere maite zinan Juliette Greco, *Deshabillez-moi* beti iruditu zaidan zoragarria, hiri ez?–, baita gertuagoko kezkak ere –*"Le mal de vivre / Qu'il faut bien vivre / Vaille que vivre…"*, lehengoan horren bideoa ikusten egon nindunan ordenagailuan, eta larrua laztu zitzaidanan!–. Eta badaude bestelako gozamenak ere: entzutea, besterik gabe, hitzei gehiegi erreparatu gabe, hitzei ere erreparatuta…; txinparta sortzen da beti, non edo non.

Monique Andrée Serf Neuilly-sur-Seinen hil zen 1997an, baina Barbara gurera etortzen ohi da, noizik eta behin. Adiskidea dut-eta. Zelan ez, entzuten dudanero halako zirrara –baita fisikoa ere– sorrarazten badit!

**BEGO MONTORIO.** BILBO, 1959
Musikazalea

[ 10 ]

## EVERY ONE OF US
ERIC BURDON & THE ANIMALS



MGM, 1968

Hamasei hilabete baino gehiago eman nituen zaborrak miatzen zerbait aurkituko nuen itxaropenez, auskalo, interesgarria izan zitekeen edozein gauzaren bila. Aspertze hutsagatik hasi nintzen eta zeren bila ari nintzen jakin gabe, baina gauero motxila eta MP3a hartuta, txirri bati zupada pare bat egin eta arkeologi hondakinen bila abiatzen nintzen. Furgoneta bat erostea ere pasa zitzaidan burutik, aurkikuntza astunegiren bat eraman beharko banu. Zorionez ez nuen halakorik egin.

Zoratzen ninduen hiritik zehar noraezean ibiltzeak, besteek botatzen zutena bilatzen. Oraindik orain zalantza dut, gainontzekoekin konpartitzeko abandonatzen zuten hura guztia, ala zaharkitzapen kontsumista hutsagatik.

Zaborra saltoki handien modukoa da, denetarik eta prezio onean aurki daiteke. Aitari oparitu nion josteko makina bat, Academy markako gitarra elektriko bat, zenbait bizikleta, hirurogeita hamarreko hamarkadako eski parea, bikote baten ezkontzako argazki albuma –horrenbestez banatuta egongo dira, ziurrenera–, musika kate txiki batzuk, bozgorailuak, idazmakina pare bat, 61eko *pick-up* bat eta, bereziki, binilozko 33 disko eta libreta bat gordetzen zuen plastiko beltzezko poltsa bat.

Poltsa zabaldu eta begirada bat eman nion gainetik materialari, ez nuen denbora askorik ematen begiratzen zaborretan nengoela, motxilan sartu eta etxera heldu arte itxaroten nuen altxorra aztertzeko. Kasu honetan: *Blues Breakers with Eric Clapton*, Hugh Masekelaren *Is Alive and Well at the Whisky*, Otis Rushen *Cold Day in Hell*, Carl Holmes & Commandersen *Twist Party at the Roundtable*, besteak beste….

Kontu honen alderik interesgarriena, 33 binilo aurkitzeko zorteaz harago, libreta arakatzea izan zen. Eskuz idatzita, 33 diskoen arteko bakoitzari buruzko datuak, oharrak, ideiak eta apunteak ageri ziren, Alejandro Castrejanak *Ritmo Juvenil* izeneko musika-aldizkari batean argitaratutako kritiken ebakinekin batera. Diskoekiko garaikidea zirudien aldizkariak.

Ibonek eta Leirek istorio bihurtutako soinuzko esperientzien segida honetan parte hartzera gonbidatu ninduten unetik argi nuen nire lana eginda zegoela. Areago, testua entregatu duen lehenengoa naizela esango nuke. Alejandro Castrejanak idatzi zuen diskoaren kritika, ordutik nire disko gogokoentzat dudan diskoaren kritika: Eric Burdon & the Animalsen *Every One of Us*.

Honekin batera, beraz, 1968ko irailean Alejandro Castrejanak *Ritmo Juvenil* aldizkarian egin zuen kritika bera gehitu nahi izan dut.

aprenda corte y confección
en su casa, por correo y gane dinero...!

Circulo Internacional de Costura

pida folletos GRATIS hoy mismo !!!

Eric Burdon & The Animals

**PABLO SALGADO.** PORTUGALETE, 1980
Kultur eragilea
banizunizuke.com

[ 11 ]



## STREETNOISE
JULIE DRISCOLL, BRIAN AUGER & THE TRINITY

Marmalade/Polydor, 1969

### ERABAKIA
Haight Ashbury, Woodstock, Trips Jaialdia, Monterey, Acid Test, LSD eta hamaikatxo gertakizun musikal eta kulturalek definitu zuten psikodelia eta mugimendu horrek mundu osoan eman zuena. 60ko hamarkadaren hasieran jaio zen, baina 1967ko udan, maitasunaren udan, heldu zen unerik gorenera.

Latza izan da ditudan disko original guztietatik bakar bat aukeratzea; jakina, denbora luzea eman dut erabakitzen eta, esperokoa zenez eta zoritxarrez, nire talde gogokoenetako asko alde batera utzi behar izan ditut, baina horrelaxe katalogatu behar da bilduma bat, disko on asko baztertuz eta, azkenik, gogoaren edo zaletasunaren arabera sailkatuz, lehenengoraino heldu arte.

Aukera honen alde egiteko aintzat hartu dut, bai lanaren originaltasuna, bai konposatzaileen eta interpreteen kalitatea, bai karpeten diseinua eta bai musikaren historiari ekarri ziotena; izan ere, gaur egun abangoardiako piezak izaten jarraitzen dute. Hala ere, azken erabakia bihotzak hartu zuen, artea lehenbizi sentitu egiten baita, gero ulertzen eta ikasten da. Baina oinarrizkoena gozatzen jakitea da. Beraz, ladies & gentlemen, izugarrizko ohorea da *Streetnoise* aurkeztea, nire uste apalean psikodelia diskorik onena.

### DISKOA
Zalantzarik gabe, psikodeliaren mugimenduko disko nabarmenena da hau, maisulana. 16 kantuko disko bikoitza, zein baino zein azidoagoa, tartean Miles Davisen *All Blues* edo The Doorsen *Light My Fire*, ezagunenak aipatzearren. Jakina, kantu originalak ere badaude...

Minutu eta erdiko abestiak daude, baina zazpi baino gehiagokoak ere bai, oso kontu tipikoa psikodeliaren esparruan, konposizioak inoiz amaituko ez zirela ziruditen abestiekin luzatzen baitzituzten, baina droga txarraren moduan mendean hartzen zaituzte, eta bidaia musikala amaitzean gehiago nahi izaten duzu.

### TALDEA
Esan behar dudan lehenengo gauza da disko hau gure ustez ingeles psikodeliaren harribitxietan harribitxiena dela. Julie Driscollen ahotsa entzuteak ilea lazten dit, ahots kordetatik ateratzen den nota bakar batekin hipnotizatzeko gaitasuna du, bere sentipena benetakoa da eta horrek harantzago eramaten zaitu, Brian Augerren taldeak lagunduta. Taldearen eszenaratze, itxura eta kalitatea ezin hobeak ziren, Brian Augerren organo zorrotzak dena apaintzen zuelarik, inoiz ez baitzion akorde batek ere ihes egiten. Erresuma Batuko Hammondaren izarra zen Auger, bere herrikide guztiek miretsia. Labur esanda: aukera baduzue

entzun ezazue, mesedez! Hau zein taldearen beste edozein album edo single, ziur nago ez duzuela inoiz ahaztuko, sakonki tatuatuta geratuko zaizkizue beren dotorezia eta mistizismoa.

### SASOIA

Sasoi hartan, AEBetako mendebaldeko kostaldea zen, gehienbat, musika psikodelikoaren gune nagusia. Zenbait ekoizle aitzindariak izan ziren talde ezezagunen alde egiten, nazioarteko izar bihurtzeko asmoz. Hori dela-eta, talde ugari hara aldatu ziren, giro azidoak erakarrita eta espaloiei, etxe okupatuei edo tabernei zerizkien lurrin artistikoak –gure kasuan musikalak– arnasteko asmotan. Orduan, Augerrek Londres hari agur esatea erabaki zuen. Londresek giro alaia zuen, baina musikariaren konposaketetarako estu samarra zen, dramatikoak ez zirenean technicolorrekoak baitziren, inspirazio psikodelikoaren eta Trinityren bikaintasunaren ondorioz. *Streetnoise* disko hau horren adibide da, belus purpura esaten zitzaion, LSD txinpartatsua, nahiz eta Londresko Advision estudioan grabatua izan zen.

### JULIE

Julie Driscoll abeslari eta izarra 1947ko ekainaren 8an jaio zen gure mundura, Londres hiri kosmopolita eta musikazalera, hain zuzen. Bere ahotsak Janis Joplinen indarra, Grace Slicken psikodelia, Linda Hoyleren xumetasuna eta Florence Lawrenceren interpretatzeko gaitasuna zituen; laburbilduz, ahalmen artistikorik hoberenak zituen gerora bere ibilbide profesionala izango zen horretarako.

Julie Driscollek betidanik liluratu gaitu, oholtza gaineko planta sekulakoa du, eder-ederra da, mistikoa, interpretatzeko moduak keinu egiten dio irrealtasunari, Londresko jazzaren Maria Callas da. Halakoxea da gure *prima donna*, Brian Augerekin batera *Streetnoise* honen *alma mater*-a: karisma harrigarria du, bere ahotsa poesia hutsa da, zeharo perfektuak dira konposizioko mugimendu musikal guztiak, aditu eta berehala pertzepzioa iratzartzen du, tonua baxuenetik kontraltora doa, nota altu ezohikoen kolore gozotik beheko noten argilunera. Ahotsaren tinbre bikainarekin gauzatzen dituen dardarazko parabola zehatzek entzulearen arreta bereganatzen dute, erregistro guztiak harmonikoak eta ausartak dira aldi berean; nota guztiak, tonu guztiak dira bereziak, misteriozko aura batez inguratu eta ipuin miresgarri batera eramaten zaitu, Juliek transmititzen dakien barne-bakean sakonduz.

Eszenaratzea are asaldagarriagoa da, arropa hippyak jantzita, clownentzako makillajea erabiltzen du, betazalak belztuz mendeek moldatutako ametsean galdutako begirada nabarmentzeko, dantza hipnotikotan kulunkatzen da abesten duena sentituz; eta bulkatu egiten gaitu, automatak bagina bezala, bere alaitasunaren, beldurraren, maitasunaren edo bakearen bidez. Nabarmendu behar dugu, era berean, konposatzeko gaitasun handia zuela eta garai hartako gitarra akustiko jotzailerik onenetako bat zela.

Berehala murgildu zen musikaren munduan eta Giorgio Gomesky ekoizle eta managerrarentzat lan egitea lortu zuen. Gomesky etorkina zen, Georgian jaioa,

Errusian hazia, Suitzara erbesteratua eta Italian hezia. Azkenik Londresen egokitu zen. 50eko hamarkadan bertako jazz eszenako buruetako bat bihurtu zen eta Richmondeko lehenengo jazz jaialdia antolatu zuen, munduko ospetsuenetariko bat.

Baina jotzea zen Juliek zinez desiratzen zuena. Gaztetan Jimmy Page, Jeff Beck, eta Eric Claptonen Yardbirds taldearen fan klubeko administratzailea izan zen; hala ere, luze gabe lortu zuen Gomelskyk aukera bat ematea eta zenbait single grabatu zituen, gaur egun aurkitzeko oso zailak direnak. Haien artean nabarmenduko ditugu Lovin' Spoonful taldearen *Didn't Want to Have to Do It* eta Randy Newmanen *If You Should Ever Leave Me* izenekoa. Saio haietako batean, Brian Auger estudiora joan zen (bera ere Gomelskyren begikoa bai-tzen) eta Julie abesten entzun zuenean aho bete hortz gelditu zen. Harengan basapiztia bat irudikatu zuen, gure nahietara belaunikatu ordez, erasotu eta defenditzen direnetakoa. Limurtu egin zuen. Hain gogorra zuen izaera ezen gainezka egiten zuen, bere Hammond B3aren indarrarekin lehia zitekeen bakarra zen, eta ez zuen zalantzarik izan buruan zuen talde berri baterako fitxatzean. 1965. urtea zen eta The Steampacket zuen izena taldeak. Kideen artean *Long John* Baldry eta mod gaztetxo bat, Rod Stewart izenekoa (bai! buruan duzuen horixe) zeuden, beren abestiak izugarriak ziren eta publikoak besoak zabalik hartu zituzten, baina kideen egozentrismoagatik taldea desegin zen, Londresko klubak bi urtez betetzen eman ondoren.

**AHOTS FEMENINOAK**

Argi dago, bestalde, misteriotsua den zerbaitek lotzen duela psikodelia ahots femeninoekin, emakumezkoek erruz gainditzen dituzte gizonezkoak estilo honetan; esaterako, The Doors taldeak bere lehenengo LPan (*Whisky Bar*) ezagutarazi zuen *Alabama Song* kantuaz entzun dudan bertsiorik onena zahar-zaharra zen; arbelezko disko batean dago grabatuta 40ko hamarkada baino lehen, eta Lotta Lenya izeneko emakume batek kantatzen zuen: budu hutsa.

Psikodeliaren mundu azidoan badirudi musika idazten dutenak emakumearen arimaren bidez bidaiatzen direla. Agian emakumeek beste izaki bat sentitzeko eta barruan eramateko duten berezko gaitasuna da hain musika mistikoa erraztasun horrekin interpretatzeko gaitzen dituena, urrun, arrotz, bakar eta ezberdin, baina haiengandik datorren zerbaiten izaeraren erdibitze moduko bat, eta haiek efektu hori ahotsezko erregistro ezinezkotan islatzea lortzen dute. Nire ustetan, naturaz gaindiko zerbait da.

**THE TRINITY**

Hastapen berezi horren ondoren Julie eta Brianek trasteak hartu eta The Trinity sortu zuten, inoizko talde psikodelikorik hoberena, ezbairik gabe. Kideen artean ziren Clive Thacker (bateria) eta Dave Ambrose (baxua), eta propio gehitu zuten metalen atal bat, soinu distiratsuagoa lortzeko, eta zure gorputzak eta buruak oharkabean harrapa zitzaten musikak soilik sorraraz ditzakeen sentsazio horiek.

Talde honen jaiotzak rockerako ezarrita zeuden arauak aldarazi zituen, jazza, soula, folka, rhythm'n'bluesa eta, jakina, bere eraginik nabarmenena, psikode-



lia, fusionatuz. Horrekin lortu zuten gaur egun izatea musika esparru honetako talderik arranditsu eta estimulatzaileena. Orkestrazioek sortzen dituzten haluzinazio psikotropikoek Lewis Carrolen edo Tolkienen amesgaiztoen eta garai fantastikoen mundura eramaten zaituzte.

Aparta izan arren, The Trinityren ibilbidea labur samarra izan zen. Grabatu zituzten singleak *The Mod Years 1965-1969* disko bikoitzean ditugu entzungai. Bertan Brian Augerrek The Stempacketekin egin zituen grabaketak ere ageri dira.

The Trinityren formazioarekin lau LP grabatu zituzten, baina Juliek hirutan baino ez zuen parte hartu: *Open* (1967), *Definitely What* (1968) eta hemen aurkezten ari garena, *Streetnoise* (1969). *Streetnoise* bi binilok osatzen dute eta banaka zein elkarrekin ezinbestekoak dira psikodeliaren zaleentzat eta edozein melomanorentzat.

Juliek parte hartu zuen beste disko horietako bati buruz hitz egingo dut, testu honen helburua horixe ez bada ere; *Open*, hain zuzen ere. *Black Cat* kantua gailentzen da, Brian Augerrek berak idatzita eta interpretatua, Hammond B3ari goitik eta behetik kea dariola eta dantzak pistan zapatak sutan jartzen dituela. *Tramp* kantuaren soul psikodelikoa ere nabarmentzekoa da, Lowell Fulson eta James McCracklinek idatzia, Julieren ahotsaren indarra muturreraino heltzen da. Aretha Franklinek berak inbidia izango zion Julieren ahotsaren edertasunari. Donovan Leitchen *Season of the Witch* ere biltzen du, ezagun-ezaguna eta hamaika bertsiotan emanikoa. Ia zortzi minutuz aritzen dira psikodelia hutsa egiten eta Juliek gogoz eta gogor erakusten du noraino hel daitekeen.

Gure *Streetnoise* disko bikoitz honetan *Czechoslovakia* izeneko kanta bikaina dago, Julie Driscollek idatzia. Abesti psikodeliko harrigarria da, sei minutu baino

gehiagokoa, eta amaiera apoteosikoa du. Xume bezain elitista da *A Word About Colour,* Julierena ere; folk kantua da, bokala eta akustikoa, gitarrak eta ahotsak entzule sibaritenen belarriak gozotzeko modukoa.

*Indian Rope Man* (Havens, Price & Roth), pista guztiak suntsitzeko idatzia, zoragarri entzuten da Julieren ahotsarekin eta Brianen organoarekin, honek kantuaren zama osoa bere atzamarren aparteko arintasunean jartzen duela. Begiak itxi eta hauxe imajina dezakegu: kantatzar honen performance baten erdian sartu gara inguruko eliza abandonatu batean, kolore distiratsuen garaia eta Londres doilorraren iluntasun gotikoa aurrez aurre daudela, ia elizakoa dirudien B3 organoak intsentsu usainezko irudi abstraktuak marrazteari ekin dio. Organoari gehitu zaizkio gainontzeko taldekideak erritmo sutsu eta kitzikagarriak joaz, zentzumenen dantza, erritmo hutsa! Eszenatokian hainbesteko kea jaurti dutenez ezin da ikusi zer ari den gertatzen. Publikoak ezin dantzari utzi, argiak ñir-ñir ari dira, Hammond B3aren notek jende oldea zeharkatu dute jauzika eta estropezuka, sentsazio psikotropikoz gainezka uluka hasi eta desegin dira berriro jaiotzeko musika topaketa oniriko honetan. Argiztapenari erreparatuta, olio-lanparak beren irudiak proiektatzen ari dira gure interpreteen gainera, izaki erraldoi baten odol-isuria irudikatuz. Jarraian, *Light My Fire* kantuaren bertsioa entzun da, marmar fantasmagoriko horiekin; ondoren, oihartzunak, Brian Augerren introen erritmo bizkorrak protagonista izateari utzi dio bere jario bereziarekin kontakizun sutsua garraiatzeko, eta gure pertzepzioari bidea zabaldu dio, soloek fantasia akustikotan murgildu gaituzte eta ahotsak bere bidea egin du hipererrealitatearen infiniturantz.

Gure egongelara itzuliz, 5th Dimension taldeak ezagutarazi zuen *Flesh Failures (Let the Sunshine In)* kantua nabarmenduko dugu. Juliek arima osoa jarri zuen bertsio honetan eta gu erabateko zoriontasunera eramaten gaitu bere ahots xarmagarriak xehatzen dituen bihurgune malkarretatik, garun-azaleraino heltzen zaigun habaila sortuz eta kanpokoa jasotzeko eta bizirauteko dugun oinarrizko senera gehituz, gure adorea bizkortzeko eta bizipozez betetzeko. Barruko eguzkia distirarazten digu, eta gehien gustatzen zaiguna euriari begiratzea izango balitz ere, bost axola! *Let the Sunshine In* abesten amaituko dugu, birikiak bota beharrean.

## BALORAZIOA

Psikodeliaren pastelaren ginga da *Streetnoise*, 1969 miragarri hartako harribitxia, zenbaki erotiko mitikoarena, amaitzear zegoen hippy garaikoa, eta azken batean, musikaren iraultzarena. Disko hau musika garaikidearentzat Michelangelo artearentzat izan zen gauza berbera da (adituen arabera inork ez baitu lortu gainditzea) edo, konparazio zehatzago bat egite aldera, kubismoa arte klasikoarentzat izan zena, abstrakzioa figurazioarentzat, interpretatzeko askatasuna. Jazzari, bluesari eta aldez aurretik ezarritakoari beste ikuspuntu bat eman zion. Sormen perfekzioaren itzulerarik gabeko puntua da disko hau.

*Streetnoise* hitzak kaleko zarata esan nahi du, baina ez du ezer zaratatik, uste dut erreferentzia egiten diola, gehienbat, 60ko hamarkada amaierako Londresko kaleetako aldarriari, kantoietako marmarrari, lurrazpiko tabernazuloen oihartzunari. Geroztik inork ere ez du lortu kultuzko disko hau gainditzea.

Altxor musikal honen errudunak Brian Auger (organoa, pianoa, piano elektrikoa eta ahotsa) zein Julie Driscoll (ahotsa eta gitarra akustikoa) izan ziren. Biok Clive Thackerekin (bateria eta perkusioa) eta Dave Ambroserekin (gitarra akustikoa, ahotsa eta baxua) The Trinity osatu zuten eta publikoaren laudorioak jaso zituzten, diskoetxeek ezarritakoa irauliko zuen esperientzia musikal berrien egarri baitzen. Diskoetxe mugatzaile eta kontrolatzaile horiek etengabe zentsuratzen zuten; musikariak eskandalua sortzen saiatzen ziren, gizarte itxurazale, hipokrita eta zaharkituak ezartzen zien uztarritik lokabetu nahi zuten, eta askatasunaz gozatu adimenari, sormenari eta perfekzioari bizkarra eman gabe. *Streetnoise* bezalako maisulanekin lortu zuten.

Azala grabatu obskurantista bat da. Bertan taldekideak ageri dira, musikari ibiltariak balira bezala, erabat desitxuratuak, jendetza ilun eta txirotu batek inguratuak, El Boscorena dirudien marrazki horietako bat, orduak eman ditzakezulako begira, xehetasun berriak aurkitzen. Brian organo ikusezin bat jotzen ageri da, Clive danbolin batekin, atso bat leiho batetik burua ateratzen, eta tren bat eraikinen artean eta zubi batetik pasatzen. Londresko Candem Town erogarria dakarkigu burura. Ralph Steadmanek marraztu zuen diseinu grafikoaren *delicatessen* hau. Gozagarria ezinbestez.

Binilo zoragarri hauen karpetak harritzekoak dira. Bertan sormenak gainezka egiten du. *Streetnoise*-ren azalak horixe berresten du, karpeten maketazioetako diseinua ere artelana delako. Begietarako masaje honek ezinbestekoago, erakargarriago eta errazago egiten du musika estilo honekin zaletzea.

Amaitu aurretik zehaztu behar da ez dela soilik *Streetnoise* hau apartekoa dena, musika psikodeliko guztia ere hala da, disko txundigarriz, errepikaezinez eta ezinbestekoz beteta dago. Fanatikoentzat, adituentzat, zaletuentzat eta musika on pixka bat entzun nahi duenarentzat sortua da, zu edo ni bezalakoentzat, belarri pribilegiatuentzat idatzitako kantu bat entzun eta bere pasioa deskubritu zuen horrentzat.

**JORGE ALONSO.** BILBO, 1972
Disko saltzailea
flamingo-records.com

## [12]

## **JOHNNY CASH LIVE IN SAN QUENTIN** | JOHNNY CASH



Columbia, 1969

**BIDELAGUN LEIALA**

Norbanakook pentsamendu sinplistarako joera daukagu eta, mentalitate kutre horri esker, pentsatzea ekiditen dugu. Gai edo gertaeren jatorri eta zergatietan sakondu ordez, aurreusteez baliatzen gara. Aro digitalean iritziek ez dute balio, pentsatzetik posizionatzera pasatu gara. Egoera berri horren adibidea da yankiek ezarri, eta gurean ere oso modan dagoen leloa: “gurekin zaude edo gure aurka”.

Dibertsitateak dualismoari eman dio bide. Bia bilakatu da munduko errege berria. Jada ez daude mila aukera; errealitatea ikusi eta ulertzeko ditugun betaurrekoek bi aukera eskaintzen dizkigute soilik kasu bakoitzean. Batzuk onak diren bitartean, besteak txarrak dira. Batzuk ezkerretik doazen bitartean, besteak eskuinetik doaz. Irabazleak eta galtzaileak daude. Zuri-beltzezko munduan bizi gara, eta diotenez, ez dugu inoiz lortuko ostadarra harrapatzea. Dena da zuria ala beltza.

Bada, nik aukeran beltza nahiago dut. Ze arraio, maite dut beltza! Konnotazio desatseginez josita dagoen kolorea da, baina hala ere, atsegin dut. Kolore beltzak esanahi ederrak dakarzkit burura; kolore beltzak oroitzapen goxoak dakarzkit burura. Beltza da gaua. Eta ze arraio, maite dut beltza! Beltza da Johnny Cash. Eta ze arraio, maite dut beltza!

Egia esan behar badut, ez dakit noiz entzun nuen lehen aldiz musikari estatubatuarraren izena; bere abestiren bat lehen aldiz noiz entzun nuen ere ez. Agian, bizitzan zehar ibiltzen ditugun lerroetako batean oinez nindoala izango zen. Edo akaso, Folsomeko espetxearen ondotik igarotzen zen trenean bidaiatzean izango zen. Edo izan liteke, Renoko kaleren batean, pistola batek tiro egitean entzun izana. Edo besterik gabe, kalean nire ondotik pasatutako Susana izeneko mutil batek abestu izana.

Ez dakit noiz ezagutu nuen, baina badakit inoiz ez dudala ahaztuko. Eta beste askok ere ez, izan ere, bere musikak ez ezik, bere izaerak egin du Johnny Cash ahaztezin. Janzkera garrantzitsu bilakatu den garai honetan, jarrerak ahantzi ditugu. Eta Johnny Cash zerbait baldin bazen, jarrera zen. Abesti umoretsu eta serioak, baina beti kritikaz eta ironiaz beterik. Garratza eta goxoa aldi berean. Mezuak eta musuak. Barru-barrutik abesten zuen, eta dena ateratzen zitzaion esfortzu handirik egin gabe. Kakalarri handia duzunean gertatzen den bezala. Plausta!

Mundua zuri-beltzezkoa da, espetxeak ordea, beltzak dira. Ilunak. Hotzak. Galtzailez betetako ghettoak dira. Ondo zekien hori Cashek, bera ere, preso egondakoa baitzen. Hala ere, ez zen inoiz ahaztu ahaztuekin eta espetxe bat

baino gehiagotara eraman zuen bere musika. Ilun zeuden tokiak argitzeko asmoz. Toki hotzak epeltzeko asmoz. Jendaurrean biluzik, gitarra eskuan eta sentimenduak ahoan zituelarik.

1964ko otsailaren 24an, Kaliforniako San Quentin espetxera hurbildu ziren Johnny Cash eta enparauak. Kontzertu hori Granada TVkoek emititu zuten, baina lehenbizi, abesti zehatz batzuk ez jotzeko eskatu zioten Cashi telebistakoek. Musikariak ez zien jaramonik egin, eta kontzertua hasi eta berehala, ondorengoa esan zien presoei: “Telebistakoek esan didate zein abesti jo behar dudan eta zein ez, baina hemen guk nahi duguna egingo dugu, eta zuek nahi dituzuen eta nik nahi ditudan abestiak joko ditut”.

Konplizitate ikaragarria sortu zen hasieratik *Beltzezko gizonaren* eta presoen artean. Eta konplizitate hori klimaxera iritsi zen Johnny Cashek egun horretarako espresuki konposatutako *San Quentin* abestia jotzean. Presoek hala eskatuta, abestia bukatu eta segituan berriz jo zuen abesti bera. Ia berrogeita hamar urte pasa dira egun hartatik, baina diskoa entzuten dudan bakoitzean, ileak tente jartzen zaizkit. Beraz, imajinatu ere ezin dut egin bertan egon zirenek momentuan bizi eta sentitu zutena zer izan zen. Johnny Cashek berak aitortu zuen urte batzuk geroago egun horretakoa ikaragarria izan zela, espetxea puskatu eta denek bertatik ihes egiteko besteko indarra eta giroa sortzeko modukoa.

Munduan dagoen dualismo bera egongo da espetxeetan ere, beraz, egunaren eta unearen arabera, presoak preso sentituko dira edo aske. Ziur nago, kontzertu horrek iraun zuen bitartean San Quentinen zeuden gutxi sentituko zirela preso. Musikaren magia. Magia Beltza. Eta ba al dakizue zein zen Johnny Cashek espetxeetan kontzertuak ematearen arrazoia? Espetxeetan sufritu eta torturatu egiten dela. Horrelakoa zen *The Man in Black*, irabazletzat kontsideratzen zuten arima galdu bat.

Nik ere sarri pentsatu izan dut, eta geroz eta argiago daukat, guk uste baino jende zintzoagoa dagoela espetxeratuta. Eta guk uste baino jende gaiztoagoa dagoela barroteetatik at. Eta Johnny Cash entzuten jarraitzen dut nondik gatozen, nor garen eta nora goazen ez ahazteko. Eta mundu dual honetan aske sentitzeko.

**JON ARRIAGA OLABARRIA.** MARKINA, 1986
Musikazalea

[ 13 ]

## IN THE COURT OF THE CRIMSON KING
KING CRIMSON



E.G./Island, 1969

**ASKATASUNA ALIENAZIOA DA!**

**-I-**

*In the Court of the Crimson King* LPa (1969) King Crimson talde britainiarrak atera zuen lehenengoa izan zen. Geroztik hamahiru bat album kaleratu zituen eta zuzenean grabatutako beste hogeita bost bat, konpilazioak eta singleak kontatu gabe. Baina izan, lehen disko hau da, inolako zalantzarik gabe, King Crimsonen behin betiko klasiko bat-batekoa. Jazza, inprobisazioa eta musika klasiko edo sinfonikoarekin nahastutako rock progresibotzat hartzen da, eta adituen arabera, rock sinfoniko-progresiboaren eredu nagusienetarikoa da gaur egun ere; hain nagusia non CDaren bertsio berria bermasterizatu egin baitzen albumaren 40. urtemuga ospatzeko, eta 2010ean edizio berri bat aurkeztu baitzuten, biniloan.

Merkantziaren fetitxeak fetitxe, disko mitiko honetan zehar barreiatzen diren tentsio dialektikoak dira interesgarriak. Horrela, musikari dagokionez, tentsio horiek melodien eta armonien kontraste zein gora-beheretan azaleratzen dira, entzulearen emozioak hala hemen soinuen apurketa erritmikoz arras lehertzen dituztenak, nola han lasaitasun geldoz arras baretzen…

Guri, hala ere, kantuen letrak interesatzen zaizkigu gehiago. Kantuen gaietan eta hitzetan, hain zuzen ere, bereizketa nagusia etorkizuna saihestu nahi duen orainaren eta iraganaren artean sortzen da. Bereizketa edo marra nagusia, hain zuzen ere, etorkizuneko XXI. mendeko gizon eskizoideari eskainitako lehen kantuaren eta beste gainontzeko (azpi)kantu guzien artean sortzen da. *XXI. mendeko Gizon Eskizoidea* kantuan:

*"[Hasteko] neurozirujauak oihuka dabiltza paranoiaren pozoi-atarian. [Gero] gizon diru-egarriak heriotza erein du itsu; poetek, aldiz, gose diraute; haurrek odol-isur. [Eta azkenik] odol-askak, alanbradak: politikarien hil-egurketak, napalm suak errugabeak ditu bortxatzen."*

King Crimsonen lehen diskoaren lehen kantu honetan, gizarte garaikideko benetako mundu *errealaren* amesgaiztoen deskribapena agertzen zaigu: materialismoaren garaipena Vs espiritauren heriotza, filisteismo anti-estetikoa Vs poesiaren ezintasuna, haur inozentziaren bortxa Vs politikari helduen zinismoa… Vietnamgo gerra… eromena…

Ondorioz, ez da harritzekoa gero beste kantu guzien imajinarioek modu bateko edo besteko fantasiazko erregresio mistifikatzaileetan murgiltzeko joera erakustea, benetako munduaren zatar eta egonezari ihesa proposatuz.

Alde batetik, horrela, bigarren eta hirugarren kantuetan hainbat testuinguru distopikoren giroak aipatzen zaizkigu, nahastean oinarrituak oro. Adibidez, bigarrenean, *Haizearekin hitz egiten dut* kantuan, zera esaten zaigu*: "Kanpoan nago barrura begira, nahaste handia, desilusioa nire inguruan".*

Hirugarrena *Epitafio* deitzen da, beste klasiko bat, eta *Arrazoirik gabeko ibilaldia* zein *Bihar eta bihar* azpi-zatietan banatzen da. Bertan, zera esaten zaigu: *"Jakintza lagun hilkorra da. Nehor ez badago araurik ezartzeko, gizakideen patua kirten burugabekoen eskuetan dago. Haizeari hitz egiten diot, hitzak haizeak daramatza eta ez du entzuten, ezin du entzun."*

Eta gero berriro: *"Nahastea izango da nire epitafioa, lau hankatan nabil bidezidor zatikatu eta apurtuan. Lortzen badugu lasaituko gara eta denok egingo dugu barre, baina beldur naiz (ez dela horrela izango eta) bihar negar egingo dudala."*

Beste aldetik, berriz, lasaitasuna, xalotasuna eta bake bedeinkatuaren zentzua dugu diskoaren bigarren aldean zeharo nagusituko dena. Horrela, *Ilargi haurra* kantua, diskoko laugarrena, natura eta kulturaren arteko elkartze harmoniatsuaz barren-blaitzen da. Bidenabar, ondo banatutako bi azpi-zati ditu: *Ametsa* (hitzak) eta *Ilusioa* (soinua bakarrik, esperimental modukoa). Natur-utopiaren amets giroan, hain zuzen ere, erreka bazterrean dago neskatxa, zuhaitzekin hitz egiten, iturri ondoan gautxoriekin solasean mendi gaineko eguzkiaren zain, loreak batzen, oihartzunekin jolasean, haizean marinel, Esne Bidean barrena, egunsentiko mamuekin ezkutaketan, eguzkiari harriak botatzen… Izan ere, *Eguzki* mutikoaren irribarrearen zain dago *Ilargi* neska.

Gero, azken kantua dugu, bosgarrena eta ezagunena: *Crimson Erregearen Gortea.* Bertan *Su Sorginaren itzulera* eta *Txotxongiloen dantza* azpi-atalak tartekatzen dira gazteluko giro handientsu eta surreal-hodeitsuan: txotxongiloak dantzan, kartzelako ilargi-kate herdoiltsuak eguzkiak deuseztatuak, zaldunen torneoa, gaita-jole moreak, abesbatza sehaska kantuan, erregina beltza hileta-kantuan, hiriko atezaina ametsak oztopatzen erromesen atarian, tronpetak susorgina deitzen, lorezaina, malabarista, orkestra, jakintsu onberak, trufari irribera barrezka txotxongiloen dantzez…

Badirudi Errege Gorriaren Gortea jauna eta esklaboaren dialektika menperatzailetik at dagoela ere, zenbait hierarkiaren apurtze eta iraultze inauteri-antzekoa nabaria delarik.

Laburtuz, King Crimson taldeak plazaratu zuen lehen diskoa tentsio nagusi baten inguruan ardaztu eta antolatua da. Alde batera, *Erreal*itatea dago, lehen kantuaren materialismoa, filisteismoa, zinismoa eta gerraren nagusigoarekin gauzatzen dena are, ondorioz, espiritualitatearen, poesiaren eta inozentziaren eremuak zeharo baztertuz. Beste aldera, ihes egiteko *fantasia*-ren eremu imaginarioak daude, eko-mistizismo natura-maitalez, historizismo magiko Merlindar modukoaz eta psikodelia koloredun kaleidoskopikoz ematen zaiguna.

Zalantzarik ez, fantasiazko erantzun ihes egile hauek momentu zehatz bateko informazio zehatza ematen digute (hippy mugimendua, 68ko Maiatza, gerra inperialisten aurkako protestak…). Modu berean, hala ere, ordaindu beharreko prezioaz ere zerbait esaten zaigu, zeina diskoaren karatulan ondo asko sinbolizatu, ilustratu eta erakusten baita. Bertan, gizakide eskizoidearen predikamendu dramatikoa oso grafikoki eskaintzen zaigu…



**-II-**

Eromenari buruz ari garen puntu zehatz honetan, zer esanik ez, subjektuaren sorrera eta *sozializazioaren* teoria psikoanalitikoaren erreferentziari eusteko aukera ematen zaigu.

Eromenaren erreferentziak, hain zuzen ere, indibiduoaren eta eremu kolektiboaren arteko harreman zein dialektika paradoxalaren neurria ematen digu. Beste hitz batzuetan esanda, modernitatearen filosofia klasikoan giza-kontratu edo kontratu sozialaren beharraz jabetzen gara. Giza-kontratuak zera espezifikatzen du: alde batetik subjektua dago eta beste aldetik komunitatea dago.

Ondorioz: subjektua komunitatean onartua izateak eta parte hartzeak *aukera indartu* edo *behartuaren* egitura du*.*

Izan ere, arazoa edo paradoxa zera da: bere komunitatea askatasunez aukeratzeko gauza omen den subjektu indibiduala aukera hori egin aurretik ez da existitzen subjektu bezala. Hau da: subjektua aukera hori burutuz eratzen da. Bestela esanda: subjektuak bere komunitatea libreki onartzea *(kontratu soziala)* aukera paradoxala da, izan ere, subjektuak *aukera zuzena* burutzen duen neurrian baitu, soilik eta bakarrik, aukeratzeko askatasuna gordetzen.

Alderantziz, komunitatean subjektu izateko aukera (indartua) duenak, komunitatearen edo kolektibitatearen *bestea* aukeratzen badu –hau da: gizakide indibidual gisa, komunitaterik gabeko askatasun indibidual errotikoa aukeratzen badu, hain zuzen ere–, orduan kolektibitatetik isolamendua aukeratuz zer eta psikosia aukeratzen du.

Oinarri-oinarrian, beraz: **Askatasuna alienazioa da**. Askatasun absolutuak giza-oinarriari eta giza-loturari ezezkoa ematen dio. Beste gainontzeko konpromiso zein giza-kontratuek komunitatearekin, erlijioarekin, nazioarekin, leinuarekin, familiarekin… baita indibidualtasunaren santutasunarekin ere… askatasuna konprometitzen dute.

Zentzu honetan Jacques Lacanen ondorengo tesi hau zeharo ulergarria da: "eroa da giza aske bakarra". Zoroa aukera indartuaren tranpan erori ez den subjektua da. Eroak, beraren eta komunitatearen arteko lotura aurpegiratzeko momentuan, aukeraren posibilitatea serioski hartu eta *giza-kontratuaren* kontra egiten du.

Beraz, bukatzeko, XXI. mendeko gizon-eskizoidea ez da guztiz psikosiaren kategoria horretan sartzen. XXI. mendeko gizon-eskizoidea ez da inolaz ere psikotikoa. Gaztea izan zenean errebeldea izango zen akaso, eta garaiko gizartearen nolakotasunak ikusita komunitate *alternatiboak imajinatzen* pasatuko zuten gaztaroa. Baina imajinatzen zuten askatasuna ez zen guztiz librea izan, hau da, ez zen batere eroa izan! Ezta gutxiago ere!

Noski, gero denborarekin, XXI. mendeko gizon-eskizoide hauek guziak guraso modeliko bihurtu ziren. Beñat Sarasolak poema ezagun batean aipatu bezala, are eta gehiago, beren seme-alabekin erretzen zituzten txirriak bezainbat enrollatuak omen ziren, Euskal Herrian bertan! Beren gurasoen belaunaldikoei gaztaroan nolabaiteko momentu heroikoa bizitzea tokatu izan zitzaielako errelatu onartu *qua* kontu xelebrea aintzat hartuz; hala ere, Sarasola ez zen gauza inportante pare batez jabetu bere irakurketa erretrospektiboan.

Lehena, noski, horren enrollatuak izanik, aita akabatzerik izan ez zutelako aipamenari dago lotuta, aipamen hori, hain zuzen ere, beste azpi-belaunaldi *mitiko* baten esperientzia apurtzailearekin laburzirkuitatzen baitu: Euskal Rock Erradikaleko belaunaldiarekin, alegia; aita akabatzeko gauza zirela eta guzti uste izan zuten

amagainkale gizagaixo histerikoen belaunaldia! Barrikada, Hertzainak, Zarama… Drogas, Gari, Moso… ai ene, zenbat itzuli bizitzak ematen dituenak!

Eta bigarren hutsa, ondorengo galdera-erantzun hauetan azal daiteke: baina, azken finean, zein demontre da XXI. mendeko guraso eskizoide zaharkitu hauen grazia bedeinkatua? Batzuek kamiseta laranjak jantzi eta Lizasoko komuna *new age* batera joan zirela? Beste batzuk, autonomo antikapitalista komandoko zenbait, esate baterako, Skinnerren teosofia profesatzera pasatu zirela? Beste batzuek, troskoek eta maoek, betiere majoak zera bainoago, betiere, noski, demokrata erradikal-partehartzaile, Jaurlaritzako kultur-aholkularitza lanak egiten bukatu zutela? Edo beste batzuk, Gora Euskadi Gorria paretetan pintatzen zuten Euskadiko Ezkerreko aurrerakoien arteko aurrerakoienek, hain zuzen ere, *Donostijako* bulebarrean kaputxinoak edaten zituztela, alkoholik gabeko garagardoak oraindik asmatzeke zeudenean?…

Hortaz, zeri buruz zigun Sarasolaren poema kexatiak konbentzitu nahi? Beraien gaztaroko narratiba heroikoekin, ganorazko guraso izateari uko egin dioten belaunaldi zaharreko burges txiki hauek guziak, belaunaldi gazteak engainatzeko gauza izan direla? Edo, nolako egurra halako ezpala, belaunaldi gazteak pozik asko utzi zutela beraien buruak engainatzera?

Ez, barkatu, ezin daiteke errebeldea eta irreberentea izan eta era berean eroa, librea!

**IMANOL GALFARSORO.** ARETXABALETA, 1960
Pentsalaria
basque.criticalstew.org

[14]



## WHAT'S GOING ON | MARVIN GAYE

Tamla Records, 1971

Ahots gozoz zutitzen dizkit zuti daitezkeen atal guztiak. Belarritik sartzen da eta ez du irten nahi. Neuk ere ez dut nahi irten dadin.

What's happening, what's happening. Brother.

Neu ere atal bat izanik zutitu egin naiz. Barrua beltza daukat. Koloretako beltza, beltza ez den beltza. Mugitzen naiz, dantzatzen dut; beraz, banaiz. Baina ez nago ziur neu ote naizen edo beste bat, edo gehiago.

Hodeiak begi paretik pasatzen zaizkit atzeraka, ez gorago, ez beherago. Urtxorrota fresko bat dirudite edo masajista inerte bat kotoizko behatzez burua irekitzen, maltzurkeria gabe; tanta guztiak barrura.

Tropikala da. Ez dut ikusten baina imajina dezaket haizea bezala zilipurdika suge kantak abesten. Hegodun sugeak, ezohiko piztia narrastiak. Paradisutik egiazko paradisura zaramatzan predikadore orno-gea; barruan darabilzuna. Kalkutako Teresak bazuen zertan sinetsi.

God is my friend. God is Love. Marvin deitzen diote.

Oinen azpiko lurrak oihan berdearen sagarreraino eraman nau. Oasiko oasira. Bertan bada jendea, airez beteta bezala mugitzen dena. Trapu zirtzil batzuk besterik ez daramatzatenak. Urmaelaren inguruan dardarti, danborren erritmoari jarraiki jira ta bira besterik egiten ez dutenak. Zorionaren ederra ezagutzeak hipnotizatu dituenak. Erregutu gabe bekatu egiten dutenak jainkoaren izenean. Eta Teresa.

Flying high in the friendly sky. Fucking high in the……

Zuhaitzen berdearen gainera igo naiz. Klorofilak hortzak berdetu dizkit, bere izaeraz kutsatu, kontagiatu, hezi nahiko banindu bezala, maledukatu gehiegi omen dago garai hauetan. Freskoa ez den jende freskoa. Ez omen dakite dantzan. Horrela ezin dela. Berak erakutsiko omen digu, eta heltzeko gogor berari. Hori zoragarria dela esan diot, kasu egingo diodala. Mugitzen diren zuhaitzak direla ederrenak. Begiak itxi eta estu heldu nion. Amaitzean lehoinabarrezko tanga bat oso ondo geratuko zitzaiola esan eta erortzen utzi nintzen. Airean dantzan, erakutsi berri zidan bezalaxe edo antzera.

Mercy mercy me.

Harrizko oihanera jausi nintzen. Neoizko argien artetik funky jotzen zuen saxoa joleren batek eta ni kalearen erdi-erditik abian nindoan, erritmoak kutsatuta. Minutu luzetako travelling bat beharko litzateke jarraitu ahal izateko iritsi nintzen aldarera. Kolore guztietako loreak ziren bertan, eta argi gehiago, neoizkoak. Guztiak harrizko mahai baten inguruan. Etzateko tamaina perfektua zuen. Eta horixe egin nuen, luze.

Inner city blues.

Eskuak alboetara jarrita, albo batean daga bat aurkitu nuen. Zeinaren erabilpena bakarra, intuitiboa eta beharrezkoa zitzaidan. Adarrik adar, alderik alde marra gorri mehe bat marraztu nuen, uneka zabaltzen zena. Luze egiten diren momentu horiek bezala, astiro. Nire azala urraturik, gordetzen nuen beltzak alde egiten uztea besterik ez zen geratzen. Paperezko pantera beltz bat bailitzan, orroka atera zen hegoak astintzen. Nire azalak mahaiko mantela zirudien.

Nire gainean pausatu zen eta istant batez begietara begiratu ninduen.
Gero, dantzari ekin zion.

**ALOTS ARREGI.** AZKOITIA, 1988
Margolaria, marrazkilaria

## [15]

## **LED ZEPPELIN IV** | LED ZEPPELIN



Atlantic, 1971

**GARAI BATEKO SEMEAK... ALA EZ?**

Led Zeppelin. 1971 urtea. *Led Zeppelin IV* diskoa. Hoberena. Jadanik, urte batzuk lehenago talde perfektua batzea lortu zuten, ez da talde berria: abeslari perfektua, gitarra-jotzaile perfektua, bateria-jole perfektua eta baxu-jole perfektua. Orain, dagoeneko, LORTU EGIN DUTE!! Musikari perfektuez gain, kanta sorta perfektua, soinu perfektua eta marketing kanpaina perfektua batzea lortu dute. Disko salmenta, noski, itzela, egindakoaren ondorioa: 21 milioi disko saltzea lortu zuten.

Garai bateko semeak dira Led Zeppelin? Agian. Gogoratu dezagun zer-nolako testuinguru ideologiko eta sozio-ekonomikotan agertzen den disko hau: 1968. urtean izandako errebolten hotsa ia guztiz desagertu da, lehenengo munduko garapen ekonomikoaren eredua hobetu ezinezkoa dela ematen du (fordismoa, lehiakortasuna errebultsibo bezala, ekonomiaren hazkundea gora eta gora, *ongizatearen gizartea*, etab.), eta beraz, esan daiteke eredu horren isla direla.

Led Zeppelin:

Arrakasta = Irabazi ekonomikoak.
Kalitatea = Teknika.
Musika = Hoberena izateko lanabesa. Lehiakortasuna oinarri.

Horrela, Led Zeppelinek garai hartako baloreak ordezkatzen dituela esan daiteke. Ez da ez, noski, balore horien ordezkari bakarra, baina bai esan dezakegula sinbolo bezala hartu daitekeen taldea dela. Eta disko hau, sinboloetan sinboloa.

Dena dela, urte batzuk geroago eredu guztiak porrot egin zuen: 1973. urtean izandako *petrolioaren krisia* dela eta, etengabeko hazkundeak geldiune bat izan zuen, langabezi tasak gorantza egin zuen, *ongizatearen gizartea* ez zela hain *ongizate* konturatu ginen, fordismoaren eredua ere desagertuz joan zen beste eredu mota batzuk ordezkatu baitzuten, *toyotismoa* kasu…. eta, nahiz eta oraindik urte batzuk iraun, gainbehera hasi zen, baita Led Zeppelin bezalako taldeentzat ere. ORAIN PUNKAREN GARAIA DA! DO IT YOURSELF!

Ematen du beste era bateko eredua sortu dela! Orain bai, orain musikaren demokratizazioa dago! Orain edonork jo dezake! Orain ez dugu zertan musikari birtuosoak izan, edonor igo daiteke taula gainera eta nahi duena egin!

Horrela al da? Zirkulu batzuetan agian bai (Euskal Herrian ere badakigu zerbait honetaz...), baina orokorrean, nahiz eta beste musika eredu batzuk gailendu, ematen du sakonean dagoena ez dela horrenbeste aldatu. Gogora dezagun:

Arrakasta = Irabazi ekonomikoak.
Kalitatea = Teknika.
Musika = Hoberena izateko lanabesa. Lehiakortasuna oinarri.

Orain kalitatea ez da teknikarekin lotzen, baina bestela… horrenbeste aldatu dira gauzak? Estetikaz harantzago joatea lortu dugu?

Dagoeneko Led Zeppelin ez da existitzen. Fordismoa kasik ere ez. Halako disko-ekoizpen eredua ere ez dago modan. Baina... arrakasta etekin ekonomikoekin lotzeak, profesionaltasuna eredu ia bakar bezala ulertzeak, lehiakortasuna gure bizitzaren esparru guztietan egoteak, musikan barne... hor jarraitzen dute. Ala ez?

**AITOR AMUTIO.** GERNIKA, 1971
Musikazalea

[ 16 ]

## **THE DARK SIDE OF THE MOON**
PINK FLOYD



Harvest/Capitol, 1973

**ISPILUKO AURPEGI EZEZAGUNA**
Imajina ezazue 13 urteko mutiko bat, ilunpean, zinema bateko besaulkian eserita eta Stanley Kubricken *2001: Espazio odisea bat* lehenbiziko aldiz ikusten. Lehengusu-lehengusinekin, anai-arrebekin, gurasoekin eta izeba-osabekin etorri da baina orain bakarrik dago, txikle baten moduan bi ordu baino gehiago luzatzen den *orain* batean, dena hartzen duena, dakiena eta ez dakiena, ustez ulertzen duena eta sentitzen duena.

Egun, mutikoa hazi da, baina gehiegi ere ez, 18 urte ditu eta presaka paseatzen da Donostiatik, inora joango ez balitz bezala. Diotenez, ingurumarian eta astiro heltzen da nonbaitera, baina berak ez du heldu nahi.

Begirada azkar doakio erakusleihotik erakusleihora, eta musika tresnen denda batetik pasatzean gelditu egin da, tupustean. Irudi batek erakarri du, bere aurpegia erakusleihoaren kristalean islatuta disko baten, LP baten, azalari gainjarria; ez du sekula halako diseinurik ikusi musika lan bat aurkezteko. Ingelesez tutik ere ez daki baina THEDARKSIDEOFTHEMOON irakurri du, eta ez daki zer esan nahi duen, baina bere burua irudiz beteta dago eta ezinbestean 5 urte lehenagoko zinema hartako iluntasunean murgildu da berriro. Dendan sartzeko bulkada sentitu du eta bere burua imajinatu du, ziurtasun plantaz, eskatuz mesedez horko diskoko zerbait entzun nahiko lukeela; bai, prisma eta argia dituena, horixe, bai, *pink* zer? nola? tira, espaziokoa... zenbatean dago? Baina herabeegia da eta gainera ez du behin ere diskorik erosi, biniloz betetako espazioak inoren jainko baten jainkotegiak iruditzen zaizkio.

Hilabete geroago, ordea, ikastetxe garaiko lagunak gonbidatu ditu Gusek bere etxera (unibertsitateak oro greban dira eta uda Gabonak arte luzatuko da) erosi berri duen diskoa entzutera, *"Ilargiaren alde ezkutua"* bere hitzetan.

Gelatxo txiki batean, barroko itxurako apalategiak gainera eroriko zaizkizula dirudien horietakoa, garaiko halako familietako gurasoen oso gustukoa. Zenbat eta apaindura gehiago, hainbat eta hobeto.

Handikiro, pertsiar moduko alfonbra horietako batean etzateko gonbita egin digu anfitrioiak, guztion artean lurrean zeuden altzari guztiak bertatik kendu ondoren.

Biniloa jogailuan jarri du eta argiak itzali ditu.
Film bakar bat ez, film batzuk bakar batean bizitzea bezalakoa izan zen.

Begiak itxita eta ahoz gora, soinuek eta melodiek leku batetik bestera eraman ninduten, *Money* kantuak bidaia eten zuen arte; bide batez, eta urteak igaro direnez, ausartuko naiz esatera ez zitzaidala batere gustatu. Zer demontre egiten zuen diru-makina hark lehenengo planoan, uztartzen ari ziren plano-sekuentzia eder eta kitzikagarrien artean?

Tripoli, Libiako hiriburua, Alex lagun handiarekin eta bere senideekin. Solairu bakarreko etxea dute. Sotoa mendebaldeko produktuz mukuru dago, bereziki alkohola eta pixoihalak –neurririk gabe– (ezinbesteko produktuak muturreko adinetarako, gure kulturan, behinik behin).

Bere apartamentuan egiten dut lo. Leihotik, parez pare, berde kolore zehaztugabeko lorategi bat ikusten da eta gauetan, afalostean, musikaz mintzatzen gara, soinuez, zaratez, eta bere konposizioak entzuten ditugu gaueko ordu txikiak arte. Auzoak ditugu, baina ez ditut inoiz entzun, ezta ikusi ere, edo bai, gauero oheratu aurretik goiko leiho batean silueta ilun bat begiztatzen dut, emakume batena dela esango nuke, burua ere estaltzen dion jantziagatik. Oso geldi egon ohi da, guri begira, eta lo egiteko argia itzaltzen dudanean baino ez da desagertzen.

Goiz batean, ohean, kanpotik ozen-ozenki datorren musika bat entzun dut ustekabean. Bai, Pink Floyd da, “nire diskoa da”, eta emakumezkoaren silueta erakusten zuen leihoko etxebizitzatik dator.

Begirada jaso eta bertan dago, emakume ezkutua eta mutua, Ilargiaren alde ezkutuaren moduan, eta neure artean diot: “hauxe da bere mezua, musika hau jitoan doan bere botila da”.

Eskuarekin agurtu dut, badirudi... ez dakit, eta desagertu da.
Disko osoa entzun ondoren isiltasun handia nagusitu zen.

**JUAN JOSÉ ARANGUREN.** DONOSTIA, 1955
Eskultorea

[ 17 ]

## **RAW POWER |** IGGY & THE STOOGES



Columbia, 1973

Mehatxua. Arriskua. Seguru ez zaudela pentsatzea, edozein gauza gerta daitekeela sentitzea. Ez dakit rock'n'rollak entzulearen erosotasunari erasotzeko gaitasuna galdu ote duen, ala nik neuk, zahartzearen poderioz, sentsazio hori bilatzeko gaitasuna galdu dudan. Ez dakit. Kontua da gaur egun milaka talde on daudela, bikainak ere ez gutxi, baina gutxik lortzen dutela nigan arriskuan egotearen sentsazio hori ernatzea.

Eskorbutok hasieran ematen zituen kontzertu haiek ditut gogoan, eta lehenengo lerroetan geundenon artean sortzen zuten zirrara, urdailetik gora egiten zuen beldurraren kilika, mehatxuaren magia basatia. Geroztik, hainbatetan bilatu dut sentsazio hori, anfetamina lehenengo aldiz probatu duenak hasierako taupada hura berriro (eta alferrik) bilatzen duenaren grina bertsuaz. Topatu ere, topatu dut noiz edo noiz: The Crampseko Lux Interior soinu ekipoa birrintzen, Atari Teenage Riot Festimad jaialdian tentsioz beteriko emanaldia egiten, Naked City edo Throbbing Gristleren diskoak... Eta Iggy and the Stooges, jakina.

*The Stooges*, taldearen lehenengo diskoa, sinplea da, gordina, oinarrizkoa. *Fun House*, sei hilabete geroago jakaren poltsikoan aurkitu dugun tripi ahaztua jateak eragindako bidaia txar baten modukoa. Baina *Raw Power*... beste hariko ezpala da hori.

Historia ezaguna da. Iggy Pop eta James Williamson Londresera joan ziren 1972an, Bowiek gonbidatuta, *Iguanaren* karrera salbatu behar omen zuen diskoa grabatzera. Han, gustuko erritmo sailik topatu ez, eta Asheton anaiei berriro taldearekin bat egiteko gonbita bidali zieten. Esan eta egin. Irailaren 10ean hasi ziren lau taldekideak diskoa grabatzen, eta urriaren 6an amaitu zuten. Baina *Raw Power* urtebeteko atzerapenaz kaleratu zen. Ordurako, kontraturik, diskoetxerik eta etorkizunik gabeko taldea zen Iggy and the Stooges, Bowieren management enpresak kale gorrian utzi ostean, eta Pop eta Williamson heroinaren zurrunbilo eroan barrena labain eginak ziren ostera ere. Diskoaren porrot komertziala erabatekoa izan zen.

*“Kalean dabilen lehoinabarra naiz, bihotza napalmez beterik daramadala. Munduak ahantzitako mutikoa naiz; bilatu eta suntsitu egiten duen horixe” (Search and Destroy)*. Horrela hasten da diskoa, eta horrela laburbiltzen da bere mezua: munduak ahantzi zaituela sentitzea, napalm bola baten antzo erraiak erretzen dizkizun amorrua, dena suntsitzeko gogoa. Eromena, desesperazioa, gorrotoa. Tristezia. Mehatxua *(Gimme Danger)*.

Ez dut uste diskoaren garrantzi historikoaz luzatzea merezi duenik, rockaren historialariek esan beharreko guztia esan dutelako dagoeneko: 60ko hamarka-

daren hippismoa behin betiko akabatu zuen diskoa, punkaren aurrekaria, rock'n'rolla bibrazio txarrak bideratzeko tresna ere izan daitekeela frogatu zuen lana... Hori guztia egia da, bai, baina badago hori baino kontu garrantzitsuagorik: grabatu zenetik berrogei urte igaro badira ere, oraindik mehatxua atzematen dela Iggyren oihu eroetan, Williamsonen riff hiltzaileetan, bozgorailuetatik ateratzen den anabasa pozoitsuan. Neuk, behintzat, milaka aldiz entzun dudan arren, oraindik ere hotzikarak sentitzen ditut taberna batera sartu eta Raw Power diskoko abestiren bat entzuten dudanean. Mehatxua. Arriskua.

**GOTZON HERMOSILLA.** BARAKALDO, 1966
Izu Giroa fanzinearen argitaratzailea

[18]



## RECITAL DE CANTO POR EL BAJO PAUL ROBESON | PAUL ROBESON

Supraphon/Discophon, 1974

Mendi elurtuen gainetik altxatzen da eta harkaitzen artean burrunba egiten du Paul Robesonen baxu-ahotsak. Ingurua isiltasunak hartu du eta soldaduen armak ere isildu dira bere kantua entzuteko. Bruneten gaude, 1938ko negu gorri betean. Iparramerikarrak fronteko soldaduentzat abestu du eta sua geldiaraztea lortu du. Espainiako Gerra Zibil luze eta ankerrak mundu osoko 3.000 boluntario antifaxista erakarri ditu, eta Robesonek ere bere ekarpen txikia egin nahi izan du.

Espainiako egonaldian, Paul Robesonek fronteko soldaduentzat abestu zuen, bizilagun zibil ikaratuentzat eta Brigada Internazionalistek Voramar Hotelean ezarria zuten ospitaleko gerra-zaurituentzat. Hotel hura Castelló inguruko nekazari herrixka batean zegoen, Benicàssim izena zuena, eta duena. Zenbait hilabete lehenago, 1937ko ekainaren 24an Londresko Royal Albert Hallen hitzaldia egin zuen: “Beti nahi izan dut nire talentuak lagun ziezaion modu nabarmen eta eztabaidaezinean gizateriaren kausari. Eta gau honetan hori egiten ari naizela sentitzen ari naiz. Zientzialari bakoitzak, idazle bakoitzak erabaki behar du zein aldetan dagoen. Aukerarik ez dago. Ezin gara geratu gatazkari begira, gure Olinpo altutik. Behatzaile objektiborik ez da existitzen. Leku orotan dago gudu-zelaia”.

1892an jaio zen Paul Robeson, esklaboen biloba eta esklabo iheslari baten semea. Garaia, sendoa, azkarra eta saiatua izateko zortea izan zuen, eta futbol profesionalean zuen arrakastari eta emaitza akademikoei esker Rutgersen –bera baino lehenago bi ikasle beltz soilik izan ziren onartuak– eta Columbian ikasteko beka lortu zuen. Zuzenbidean lizentziatutakoan, New Yorkeko abokatuen bulego entzutetsu batean hasi zen lanean. Laster utzi beharko zuen: idazkaritzek ez

zuten onartzen arraza beltzeko batengandik diktaketa hartzerik. Robesonek erabaki zuen modu profesionalean dedikatzea ordura arte hobby hutsa izan zuen gauza batera: antzerkira. Arrakasta handiz egin zuen debuta Harlemen, eta gero Broadwayra aldatu zen. Bere antzerki ibilbidean Shakespeare eta Eugene O'Neill antzeztu zituen, baita berarentzat propio idatzitako paperak ere, esaterako *Showboat* (*Magnolia*) (1936). Beltzen duintasuna urritzen zuten paperak antzezteari uko egin zion lehenengo aktore beltza izan zen, eta lortu zuen arrakasta handiari esker bere pelikulen edizioa aukeratzeko eta gainbegiratzeko pribilegioa izan zuen.

Komunista konbentzitua, justizia soziala eta berdintasuna aldarrikatzen zuten kausa guztien alde abestu zuen, lintxamenduaren aurkako legeetatik hasita eta Galesko meatzarien aldarrikapenetara. Sobietar Batasunarekin harreman onak zituenez NAACPtik (Koloreko Jendearen Hobekuntzarako Elkarte Nazionala) kanporatu zuten eta naziek zerrenda beltzetan sartu zuten. Hamarkadetan egon zen ezabatua bere izena unibertsitateko eta kiroleko urte-liburuetatik, eta ikuskizunaren munduko memoria historikoan agertu zen *Magnolia*-ko *Ol' Man River* kantuaren bertsioari esker. Baina herri musikaren ibilbide gutxik izan du honen pisu eta sotiltasuna.

Bere errepertorioan *Negro Spiritual* motako kantak txertatu zituen lehenengo abeslari profesionala izan zen. *Negro Spiritual-ak* erlijiozko kantu zaharrak dira, beren erlijio autoktonoak eta identitate afrikarra ahantzarazteko esklabo afroamerikarrengan erabilitako biolentzia fisiko eta/edo moralaren ondorio. Badirudi kantu haietako askotan esklabo iheslarientzako argibideak eta pasahitzak zeudela, eta Bibliako istorioen eta esklaboen oinazearen arteko paralelismoak hainbat modutara azaltzen direla. Robesonen moduko artista konprometitu eta ongi hezitako batentzat sektore pobre eta ezjakinenetako abestiak interpretatzea herri musikaren balioa aldarrikatzeko modurik onena zen, historikoki ahaltsuenen laguntzaren eta artistarekiko sinpatia eta antipatiaren mendean zegoen tradizio kultu eta akademikoaren aurrean.

Tesitura baxu eta baritonoetara iristen zen erregistro apartari esker, eroso jarduten zuen Robesonek Bachen koralak eta espiritualak abesten. Grabaketaren giroak intentsitate eta purutasun berbera ematen dio Beethovenen *Ode to Joy* izenekoari edota *We Are Climbing Jacob's Ladder* zirraragarriari. Baxuak eta neurrizkoak dira Robesonen bertsioak. Bai Smetanaren abesti abertzaleetan, bai Bachen pieza erlijiosoetan, bai bere arbaso esklaboen musika apal eta popularrean, neurridun jokatzen du bere heziketa klasikoaren ondorioz, baina bere interpretatzeko modu sutsuari eta erabateko fraseatzeari esker, interpreteak duen salaketa asmoa agerikoa zaio entzuleari. Modu horretan, disko honen errepertorio eklektikoa ez da inkongruentea, zintzoa eta sakona baizik.

1925etik aurrera, Robeson eta bere emazte eta managerra –unibertsitatean lizentziatua eta histiologoa– Ingalaterran egokitu ziren eta aktoreak dozena bat pelikula filmatu zuen. Bere bira artistikoetako batean Sobietar Batasuna bisitatu zuen. Liluratuta eta harrituta geratu zen jaso zuen errespetuagatik, arrazakeria ororen gainetik. Klase langileen bizitza maila ere ezagutu ahal izan zuen. McCarthyren

sorgin-ehizan pairatu zuen jazarpena ere mitikoa da. Bere ibilbide artistikoa Estatu Batuetan oso kaltetua izan zen, eta pasaportea baliogabetu egin zioten.

Hauxe da, oso azaletik, artistikoki aparta izan zen gizon baten bizitza. Duintasunez eta koherentziaz beteriko pertsona mota horretakoa, ingurune artistikotik desagertu dena, 80ko hamarkadatik hona industriak eta komunikabideek modu zorrotzean garatu duten *desduintze prozesu* luze, geldo eta geldiezinagatik. Nork estima dezake Britney Spears? Pete Doherty? Lil' Wayne? Chris Brown? Paul Robesonek zorigaiztoko jende baldar horri buruz izango zuen zer esan. Ziur asko, eskua luzatuko zien laguntzeko.

Paul Leroy Robeson

1898ko apirilaren 9a, Princeton, Nueva Jersey, US.
1976ko urtarrilaren 23a, Filadelfia, Pensilvania, US

**PATRICIA GODES.** MADRIL, 1966
Musika kazetaria eta kritikaria
http://patriciagodes.blogspot.com

**[19]**



## **XABIER LETE |** XABIER LETE

Artezi, 1974

Amaren bularra haurraren janari...

… haurraren negarra beti hunkigarri. 1980ko hamarkadako arratsalde udatiar bat da. Sargori egiten du eta auto bat Urdaibaitik Durangora bidean dator, oraintxe ezkerretara oraintxe eskumatara, Mendatako bide bihurrian sigi-saga. Autoa Renault 8 bat da eta ni atzeko jesarlekuan noa arrebagaz batera; botalarri naiz, patata tortillari sabelean eutsi guran nabil. Amak Ducados bat piztu du, eztul eginez, eta aitari eman dio, honek bidean arretarik galdu barik erre ahal izan dezan. Bien bitartean, Xabier Lete kantari dabil kasetetik, bizarrek altabozetatik kanpora irteten diotela.

Ni naiz erreka zikinen iturri garbiak…

… aurkitu nahi dituen poeta tristea. 1990eko abendua da. Durangoko Azoka. Xabier Lete isilik egon da azkeneko urteetan, hesteetako gaitz larri eta artean zehaztu bako batek derrigortuta. Baiezkoa ematea ondo kostatu eta gero, Kurutziaga zineman kantatuko du gaur. Hotelean gela bat eskatu ei du trankil egoteko. Ikusmina zirraragarria da, eta halaxe jesarri gara gaueko hamarretan

aretoan: dar-dar egiten duen jarleku baten gainean. Atera da gizona halako batean. Hori da hori hitzaren zehaztasuna jendea agurtu eta kantak aurkeztukeran. Hori da hori ahotsaren indarra kantatzean, eta gorputzaren energia; begiak leize eta eskua ukabil. Betirako txundituta lotu gara, eta ikasi berri diogun aditz bat dabilkigu barrenak konjugatzen: inarrosi.

Garaziko herria benedika dadila…

… euskarari eman dio behar duen tornuia. 1990eko hamarkadaren erdialdeko goizalderen bat da. Edozein auzo, herri edo hiritako edozein tabernaren kanpoaldea izan daiteke; edozein astegun ia-ia. Baina, segurutik, bariku goizaldea da eta Gasteizko Kashba zeneko ateetan gaude. Kantari gabiltza. Hamar bat lagun. Denetiko euskal kantak ari gara lau haizetara zabaltzen, nork ozenago, lagunartearen pozak bihotza berotuta, eta, zertan esanik ere ez, garagardoak hauspotuta. Tartean dira Nafarroa arragoa, Altzateko jaun, Kontrapas eta beste hainbeste. Egunaren lehenengo argiekin etxerako bidea hartu dugunean, gaua gugaz eman duen edadeko lagun batek irribarrez diost: “Zuek kale borrokaren adar kulturala zarete!”

Berriro igo nauzu ene mendira…

… oroitzapen zaharrei maitez begira. 2009. urtea azkenetan dago. Euskadi Literatur Saria eman berri diote Xabier Leteri, eta Durangoko Plateruenera dator Egunsentiaren esku izoztuak poemarioan oinarritutako errezitaldia eskaintzera. Adinak eta urteetako osasun arazoek makalduta dago, bistan da bistan denez. Baina zelan betetzen duen agertokia oraindik ere!, hitzez, ahotsez, esku kolpez eta begi keinuz. Afaltzera ere geratu da, eta emanaldian malenkoniatsu, idor, ilun agertu zaigun Lete bera da orain umoreko, bizi eta zirikatzaile berba egiten digun Xabier. Ederra afalostea! Gauerdia pasatuta jaiki gara mahaitik, eta Brassensen *Testamentua* bertsionatuz aspaldi idatzi zituen hitz ironikoak kantatuz jaitsi ditugu eskailerak: *“Izan ez ditudan maitale guztiak, nire gelan dauden zapata bustiak… Jaurlaritzari uzten diozkat…”*. Atera ailegatu garenean, besarkatu eta elkarren ezagutza egin izanaren pozez agurtu gara. Hurrengora arte.

Izotz ondo eguzki, neguaren parre…

**IGOR ELORTZA.** DURANGO, 1975
Bertsolaria

[ 20]

## NUEVO DÍA | LOLE Y MANUEL



Movieplay, 1975

gure aitak renault 8 bat izan zuen urte luzez. haren bigarren autoa izan zen, ezkongabea zeneko 850 zuriaren ostean. egun batez konturatu zen 850ari urteak orbainak balira bezala markatzen ari zitzaizkiola karrozerian eta motorrean, eta aurrerapauso bat eman beste erremediorik ez zuela.

renault 14a berde metalizatua zen, eta distira egiten zuen erabili genuen lehen aldian. hiru anaiak, amama, aita eta ama prest geunden guadalcanalera bidaiatzeko –badajozekin muga egiten duen sevilla probintziako azken herria– artean ez ziren existitzen haurrentzako autoetako eserlekuak eta kabitzen zirenak sartzen ziren auto barruan, ez bakarrik legeak onartzen zituenak. prest zegoen dena eta familiako kide berriaren aurreneko kilometroak sinforiana veloso garciak bere jatorria oroit zezan izango ziren, gure aitak, sevillan jaio baitzen, azaletik baino bizi izan ez zituen hastapen haiek gogora zitzan.

egia esan, ez dut gogoan autoak *radiocassette*-rik ote zuen, aitak diskoa zinta batean kopiatu ote zuen, oraindik plastiko eta berri usaina zuen guanteran ote zeraman edo dena asmatu ote dudan, baina pentsatu nahi dut bihurgunez eta ilusioz betetako bide haren soinu banda lole y manuelen *nuevo día* izan zela. loleren ahotsa, manuelen gitarra, ricardo pachónen ekoizpena eta sevilla hiria ziren protagonista istorioak hasten diren tokirantz hirurogei kilometro orduko abiaduran egindako bidaian, beti itzuli behar den toki horretarantz, geure buruetan baino ez bada ere. nolanahi ere, ziurtasun osoz dakit herri hartako kale nagusian paseatu ginela, irailean agertzen den kolore horretako ostoak –ez berde ez hori– dituzten zuhaitzez betetako zumarkalea zuena, eta etxez aldatu aurretik gure birramonaren etxea izandakoaren atea jo genuela eta bere adin bereko emakume batek agurtu gintuela, bere ama familia dirudun baten etxera lan egitera jaitsi izan ez balitz gure amonaren bizitza izan zitekeena izan zuena.

gogoan dut herriko etxe hartara sartu nintzela, herriko apaingarriekin eta herriko altzariekin, lau horma horien bakardadea soilik bizi izan duenaren istorioak entzun nituela, eta ulertu nuela bizitza garratz eta keinu zoriontsuko ezkongabe haren adeitasuna gauzak kontatzeko inor izan gabe urteak eta urteak pasatzearen ondorio baino ez zela. gero, geurea ez zen bizitza bati ihes egitearen zaporea zuen agurra etorri zen, eta guztion autorako buelta, itzulerako bidea hasteko. aurreneko eskala kilometro gutxi batzuk urrunago egin genuen, amak prestatu zizkigun tortillak gosaltzeko picnicean eseri ginenean.

orduan, anaia lurrean zeuden harriekin hasi zen jolasean, eta hainbesteko trebeziaz ibili zen, non jaurtiketetako bat estreinatu berri genuen renault 14aren atean lurreratu baitzen. aurreneko egunetik izango zuen mailatu dotorea. une horretan, tortillak *tupper*-era itzuli ziren, gu berriz ere autora, eta horrela egin genuen itzulerako bidaia osoa, lolek esnatzen hasten den egunari kantatzen zion *kejioa* entzun ezinik, ezta manuelen negarra ere, tardon eta giraldari egiten zion omenaldia poesia bihurtzen zuenean. hitz bakar bat ez zen entzun itzulerako bidaia hartan eta, orain, hogei urte geroago, nire haurtzaroaren parte da, etxeko egongelako disko-jogailuan hainbestetan entzun genuen disko hura bezalaxe. ez zatekeen sekula hori gertatu ia mende bat lehenago, nire amamaren ama bizitza berri baten bila hirira aldatu ez balitz, oso gazte zela. alde batera utzi ez balu zain zuen herriko bizitza suntsitzailea *señorito* horietako baten neskame bat gehiago izateko. hiriko bizitzak eskaintzen zion liberazioa eskertu behar zaion *señorito* hori.

**MANUEL DOMÍNGUEZ RAMOS.** SEVILLA, 1971
blogaria
lanadadora.blogspot.com

**[ 21 ]**

## THE BEST OF LEONARD COHEN
LEONARD COHEN



Columbia, 1975

Bilduma honekin ezagutu nuen Leonard Cohen. 13 edo 14 urte izango nituen, eta garai hartan etxe guztietan irrati-kaseteak zeuden, irratitik zuzenean grabatzen duten horietakoak.

Gure ahizpak Leonard Coheni eta disko honi buruzko monografiko bat grabatu zuen. Hasieran abesti bat emititzen zuen, gainetik *off* ahots batek hitzak itzultzen zituela, eta ondoren, abestia, bere hartan.

Mugarria izan zen, *shock* bat, Miguel Bosé, Los Pecos eta *Superpop-eko* bestelako izarrak entzun ondoren. Engainatuta sentitu nintzen, eta eskerrak eman nahi nituen. Halako zerbait existitzen zen, eta nik tutik ere ez... zenbat gauza gehiago egongo ziren hortik, nik ezagutu gabekoak?

Zer esanik ez, maitemindu egin nintzen berarekin, nintzen nerabearen moduan. Suzanne, Marianne, Jane izatea amesten nuen, eta tristurak hartzen ninduen, nitaz inork ez zuelakoan sekula halakorik sentituko, pentsatuko edo idatziko.

Urteek aurrera egin ahala konturatu nintzen bere kantuetan jorratzen zituen gai guztiak betikoak zirela: maitasuna, desengainua, bakardadea eta bestelako sentimendu unibertsalak. Kontatzeko zerabilen modua zen gakoa.

Ez naiz bere musikaren alderdi teknikoaz arituko, ez baitut horretarako gaitasunik; ezta bere lanaz eta ibilbideaz ere, ez baitzait interesatzen bere obra, ezta pertsona bera ere. Transmititzen duena eta entzutean sortzen didan plazera dira axola zaizkidan gauza bakarrak.

Idazten ari naizen testu honek inor Leonard Cohen entzutera animatuko balu, nire gusturako, eta ahobizarrak kentzeko, kantu hauexek aukeratuko nituzke: *The Partisan, So Long Marianne, Famous Blue Raincoat* edota *Who By Fire*. Baita beste disko batzuetako beste hauek ere: *Hey, That´s No Way To Say Goodbye, You Know Who I Am, There Is A War, Seems So Long Ago, Nancy*.

Beti txunditu izan nau ozeanoz bestaldean bizi zen gizon batek abesten zuena hain hurbil sentitzeak. Adina bikoizten zidana eta nirekin komunean deus ere ez zuen. Egunotan, interneten bere historiaz eta bere abestien historiaz arakatzen, elkarrizketa batean kontatu zuen pasarte hau aurkitu nuen:

- Zein da Greziaz, Hydraz, duzun oroitzapenik onena?



- Oroitzapenik onena? Ez dut oroitzapen zehatzik. Gogoan daukat Marianne eta biok Piraeuseko hotel batean geundela, hotel merke batean. 25 bat urte izango genituen eta Hydrarako itzulerako itsasontzia hartu behar genuen. Altxatu ginen eta suposatzen dut kafe bat-edo hartuko genuela, eta taxi bat hartu genuen. Ez dut inoiz ahaztu une hura. Ez zen ezer gertatu, Mariannerekin nindoan taxian, zigarreta bat piztu nuen, greziar zigarreta bat, greziar zigarreten zapore gozoarekin, turkiar tabakoz egindakoa, eta pentsatzen nuen: nagusia naiz, nire bizitza dut, heldua naiz. Emakume eder honekin nago, diru pixka bat dugu, Hydrara ari gara itzultzen, horma margotu hauei begira. Sentimendu hori... hamaika aldiz saiatu naiz berregiten, baina alferrik. Nagusi sentitzearen sentimendu hori, ondoan pertsona eder bat duzula, gustura zaude bere ondoan, eta mundua zure aurrean dago.[2] *(Dakienak hobeto itzul dezala)*

Ez dakit zergatik, baina hunkitu egin nau, halako sentimenduren bat izan baitut inoiz nire bizitzan. “Zertarako gehiago?” sentitzen duzunekoa.

Suposatzen dut inoiz hori sentitu duen batek Leonard Cohen ere gustuko izango duela. Edo ez...

**RAQUEL TARACIDO.** SESTAO, 1967
Musikazalea

---

[2] *Interview with Leonard Cohen* Kari Hesthamar, Los Angeles, 2005 (Norwegian Radio) www.leonardcohenfiles.com

[ 22 ]

## PEIO OSPITAL ETA PANTXOA CARRERE
PEIO OSPITAL ETA PANTXOA CARRERE



Elkar, 1975

### HAURTZARO GALDUA
Sukaldeko armairuaren gainean edukitzen zuen amak magnetofoia –istriputxoetatik babesteko toki aproposagorik ez zuen harentzat aurkitzen–, beti martxan, irratiari justuko berriketak ere egiten utzi gabe. Beltza zen aparatua, garai hartarako aski modernoa, larru itxurako estalki batean bildua, pianoarenak ziruditen tekla lodikoteak sakatuz gobernatzen zena. Ukitu bitxia ematen zion sukalde zaharrari, eta logika antzeko zera bat, zentzua edo, gure pareten arteko espazio akustikoari, gure bizitzari, bertan bizi ginenon sintoniari.

Magnetofoiarekin batera, anaia zaharrena datorkit akordura, hanka fineko aulki metaliko batean igota eta oin puntetan tente, tramankuluari bazka emateko beti prest. Hamar bat urte izango zituen. Iltzatuta gelditu zaidan une hartan, azal urdineko kasete bat zeukan anaiak eskuan, segundo eskasetan trikitiaren bolada hegemonikoa hautsi eta haize erauntsia ekarriko ziguna; kantatzeko moldeagatik, bi ahotsen harmonia gozoagatik, hain exotiko eta ezezagun egiten zitzaigun hizkeragatik, lelo itsaskorrengatik nahiz abestien mami tinkoengatik, zinta ondo korapilatu arte behin eta berriz entzungo genuena. Zera zioen kaxan, psikodelia garaian usu ikusitako hizki biribilduz: Peio Ospital eta Pantxoa Carrere.

Titulu bereizgarririk gabeko disko hark dirdira bereziz argitzen zuen gure espazioa. Hura ez zen kantu-bilduma hutsa. Ezin zen gogoaren arabera gustukotzat edo zatartzat, berritzailetzat edo zaharkitutzat, hunkigarritzat edo arrunkeriatzat jo, beste edozein disko balitz bezala. Hura gure bizitzaren soinu banda zen kasik; gure inozentzia, garaian bizi genuen filmeko parte bihurtzen zuen tresna, gure egunerokotasunaren azalpena, gure orduko egia.

Hari esker ulertu genuen, hain zuzen, 1977ko martxoaren 8an guardia zibilek gure osaba metrailatu zuenean ez genuela *harengatik negarrik egin behar*. Mundu honetatik joana zela, bai, baina *Euskal Herriko zeruan izar berri bat piztera*. Lazgarria izanda ere, *hiltzailearen aurrean zutitu eta euskaraz mintzatuko* zela balaz josi aurretik. Eta guk, haurrok, ikastolakumeok, oihaneko urtxintxok, plazara behar genuela jalgi, *geure herriaren geroa* ginelako.

Disko askok eta musika molde ugarik osatu dute geroztik nire bizitzaren soinu banda. Oso gutxi dira, ordea, berriz entzuterakoan halako kutsu mingotsa uzten didatenak, estreinakoz entzun nituen garaiaren nostalgia barregarri uzten dutenak. Testuinguruak du erru puska.

Hendaian bizi naizenez geroztik, ia urtero entzuten dut Pantxoa eta Peioren abesti ezagunenetakoa, *Lepoan hartu eta segi aurrera*, eta beste kanta enblematikoren bat edo beste ere bai, bidenabar. Abuztuko Euskal Bestan izan ohi da, herri osoa ikurrinez eta lauburuz eta piperrez eta pilotaz eta baserritarrez ondo dotore jantzi eta bozgorailuetatik, bazter orotatik entzuteko moduan, *parrandarako euskal giroz* irradiatzen gaituztenean. *Pot-pourrian* grabatutako disko batetik ateratzen da kanta, egun osorako *autoreverse*-n jarrita, *¡Que viva Hendaya!* abesti-bertsioaren ondotik –Manolo Escobarrena, bai– eta *Paquito Chocolatero* patxangadaren aurretik. Egun horretan ikusten diren aitzur etilikoak ikusita, goitika egiteko akonpainamendua dirudi.

Gure haurtzaroko sentipenek turistentzat jarritako amuaren antza hartzen dute orain, merke zurreko folklorearen tonua, tamalez.

**GARBINE UBEDA GOIKOETXEA.** TOLOSA, 1967
Idazlea

[ 23 ]

## **WISH YOU WERE HERE |** PINK FLOYD

Harvest/Emi, 1975

**KOLA KAO ETA GALLETAK**
Astelehena da, goizeko 8:00ak. Soinu Sistemak eta Baliabide Teknikoak. Izen luzeegia ikasgai baterako, SBT esaten diogu. Bozgorailuen ezaugarriekin hasi gara gaur. Hogei minutuko kontua izan behar zuena luzatu egin da. Inpedantziaren errua. Termoa eta galletak zain ditugu mahaiaren gainean. Gaur palmera txikiak eta txokolatezko pasteltxoak ekarri ditu Asierrek. Eta kola kaoa. Kafearekin hasi ginen baina kola kaoak arrakasta handiagoa omen du gazte hauen artean. Hogeita piku dira, neska bakarra. Aurten inoiz baino neska gutxiago Soinuan.

Astelehen batean izan zen gure lehenengo saioa eta ordutik ez du inork kale egin. Aurreko larunbatean Gernikara joateko proposamena egin zidaten Olatzek eta Patxik. Kafea eta galletak genituen gaztetxean. Anarik jo behar zuen. Han agertu ginen. Berandu baina Nick Caven kantuak Anariren ahots eder horretatik entzuteko garaiz. Itzela benetan. Ezagutzen nuen ekimena, kristoren ideia zela pentsatzen nuen, baina zuzenean ikusitakoan, edo hobeto esanda, entzuterakoan... txundituta geratu nintzen. Zer entzuten du Anarik? Zer gustuko du? Eta Fermin Muguruzak? Ruperrek? Aiora Renteriak? Eta zer entzungo du Jonasek? Andreak? Aitorrek? Mikelek?... Burua berehala institutura joan zitzaidan, klasera. Ikasle gehienak musika zaleak dira, talderen batean jotzen edo abesten dute, asko eta asko horregatik ari dira Soinua ikasten. Ordu asko pasatzen ditugu uhin mekanikoei buruz hitz egiten, ekualizadoreak, mikrofonoak, nahas mahaiak, akustika, konpresoreak, efektuak... eta musika?

Gure bizitzen soinu bandak norenak diren jakiteko aukera paregabea izan zitekeela pentsatu nuen, interesgarria iruditzen zaigun hori, gainontzekoekin partekatzeko aukera eskaintzen zigun Gernikako gazte hauen ekimenak, soinu teknikari batek behar duen formazio musikala, ikaskideen bitartez jasotzeko aukera ezin hobea.

Neu izan nintzen lehenengoa, Anarirekin. Gernikatik ekarritako beroaldia aprobetxatu nuen ikasleen aurrean apur bat biluzteko. Ordutik astez aste nahi duenak bere saioa prestatzen du: Johnny Cash, No Konply, Cock Sparrer eta Komaren doinuz busti ditugu astelehenero klaseak. Eta gaur, Asierren txanda da.

Plastikozko poltsa batetik bideoak eta CDak atera ditu. Pink Floyd talde britainiarrarenak dira. Hasieran gustuko ez zuela aitortu digu, baina orain bere musikak liluratuta dauka. Eta igartzen zaio. Beraien estilo psikodelikoari buruz ari da, rock abangoardista, taldearen bilakaeraz mintzatu zaigu. Syd Barrett taldeko gitarristaren istorioak interes berezia piztu du. Taldearen liderra izan zen Barret hasierako urteetan, "jenioa", Asierren esanetan. Baina LSDak "bandaren arima" harrapatu zuen eta taldea utzi behar izan zuen, bere lekua David Gilmourri utziz. Orduan Roger Waters baxu-jotzaileak hartu zuen taldearen lidergoa.

*Wish You Where Here* diskoaren *Shine on You Crazy Diamond* entzun dugu, Barretten begiei dedikatutako kanta dela esan digu Asierrek. Isiltasuna da nagusi klasean. *The Wall* albumaren zuzeneko kontzertuak ere Barrettenganaino eraman gaitu. Harresiak eraikitzen ditugu pertsonok besteengandik babesteko. Barretten bizipen latzak harresiaren berunezko adreiluak omen ziren. Geuk ere geureak ditugu. Publikoarengandik babestu nahi omen zuen Watersek. Ikasleengandik irakasleak. Edo alderantziz. Baina astelehenetan gure artekoan zirrikitu batzuk irekitzen direla uste dut. Kola kao eta galleta batzuk hartzen ditugun bitartean baino ez bada.

Pink Floyden musikan barrenean jarraitu dugu, Asierren gidaritzapean. Kanta gehiago, komentarioak, galderak, zuzeneko kontzertuak, espektakulu ikaragarriak. Liskarrak taldean eta azkenean banaketa. Taldearen izena bereganatzeko borroka legalari ekin zioten Waters eta Gilmourrek. 2005eko uztailaren 2an ikusi ahal izan zen talde osoa azkenengo aldiz pobreziaren aurkako Live 8 ekitaldien barnean. Londresko Hyde Parkeraino eraman gaitu Asierrek, egun horretako kontzertua erakutsiz.

Amaiera itzela... Txirrinak jo egin du. Erandioko Tartanga institutuko txirrin desatsegina. Orduro entzun behar duguna. Baina astelehenetan ikasleek ez dute atsedenaldira berehala alde egiten, txalo zaparrada batekin bukatu da gure klasea.

**NEREA OLAZIREGI.** DEUSTU,1972
Musikazalea

[ 24 ]




## **RAMONES |** RAMONES

Sire Records, 1976

Nola aukeratu maite ditudan musika estilo, talde eta proposamen guztietatik ale bakar bat? Buelta asko emango nizkiola uste nuen. Neure buruari gisa honetako gonbiteei ezetz esaten noiz ikasiko dudan galdetzen ari nintzaionean, ordea, argitaratu diren milioika diskoen artetik bat aukeratzea zein erraza den konturatu naiz.

Nostalgiak (beste behin) lagundu dit horretan. Musika benetan garrantzitsua zen nerabezarora itzuli naiz, musikak bizitza aldatzeko gaitasuna zuen garaietara. Denda batera joan eta etxeko Phillips irrati-kasetean milaka aldiz entzuna zenuen grabatutako kasete hura “binilo santuan” erosten zenuenean, talde eta musika horrengatik apustua egiten zenuen garaietara.

Ez ziren musikari trebeenak, diskoak ez zuen diseinurik berritzaileena, ez zen kantatzen zutenaren erdia ulertzen... garai hartan, ordea, abantaila bat genuen. Musikaren inguruko posea edo eta birtuosismoa ez ziren hain garrantzitsuak. *Hype, cool, trend* eta gisako hitz eta joerak ez ziren existitzen. Gure belarriek inozentziaren himena ukitu gabe zuten oraindik. Musikak, arrazoi logikorik gabe barruak astintzeko gaitasuna zuen edo ez zuen. Ramonesen lehen diskoa, taldearen izen berarekin bataiatutakoa apustu garailea zen. Eta ez dago beste ezer esan beharrik. Ramonesen lehen lana, altxor paranormal bat da. Ramones zalea izatea, instintu, emozio eta sentimendua delako. Ramones herrialde bat balitz, nik Euskal Herrikoari uko egin eta euren curling selekzioan jokatuko nuke.

Uan-tu-zrui-for. Hitlerrek, Berchtesgadengo uda erretiroan, igerilekuko etzaulkian entzun nahiko lukeen kantua da ezbairik gabe *Blitzkreig Bop*. Uan-tu-zrui-for. Gagarinek espaziora egin zuen lehen bidaia hartan, Vostok kosmo-ontzian *I Don´t Wanna Go Down to the Basement* entzun izan balu, bertan geratu eta lurrera itzuli zenean pairatu behar izan zituenak aurreztuko zituen gizajoak. Uan-tu-zrui-for. *Beat on the Brat* entzun eta hiriko kaleei su emateko gogoa sentitzen ez duenak ez du odolik zainetan. Uan-tu-zrui-for. *I Wanna Be Your Boyfriend* da, nerabe mozolook, gu baino bi urte zaharragoa zen eta guztiz maitemindurik gintuen institutuko neska eder horri ametsetan sekretuki kantatzen genion balada. Uan-tu-zrui-for. *Judy Is a Punk*, institutuko neska bihozgabe berak, larruzko txupa eta Puch Condor motorra zuen *anormal* batekin enrollatzen zenean, maitemina hitzari lehen zatia kentzen zaionean zer geratzen den erakusten zigun. Uan-tu-zrui-for. *Now I Wanna Sniff Some Glue*..., beno, gure kasuan porroak ziren, eta ez genuen desamodiorik behar gauero etxera begi gorriekin itzultzeko. Uan-tu-zrui-for...

*Ramones* izeneko diskoa 1976. urtekoa da. Nik 3 urte besterik ez nituenean grabatu zuten. Pentsatzen dudan bakoitzean akojonantea iruditzen zait. Ni zahartzen naizen heinean, Ramonesen musikari kontrakoa gertatzen zaiola




iruditzen zait. Ramonesen kanta motz, sinple eta zuzenek Benjamin Button sindromea dutela esan genezake. Geroz eta gazteagoak sentitzen ditut bi minutu eskaseko kantuak. Gaur egungo musika panorama hiperteknologiko eta espezializatuan, Ramonesen kantuak gure barneko gizaki primitiboarekin lotzen gaituzten doinu telurikoak dira (Oteizak ez luke hobe esanen).

Amaitzera noa. Honezkero pertsona zentzudun batek orrialde batean irakur ditzakeen tontakeria kupoa bete dut. Amaitu aurretik aitormen bat eta irudi bat. Aitormena: bai, nik ere, beste askok bezalaxe, 12-13 urterekin ezagutu nituenean, Ramones abizena zuten makarra haiek anaiak zirela uste nuen. Irudia: Donostiako belodromoan eman zuten azkeneko zuzenekoan, Joey, kamerinoetatik eszenatokira zihoan eskailerak jaisten. Ttipi-ttapa geldoz, *roadie* baten laguntzaz banan-banan jaitsi zituen. Gu guztion aurrean. Ezkutatu gabe. Lotsarik gabe. Jainko batek egingo lukeen moduan. Eskaileren irudi hark kontzertu osoan iraun zuen nire buruan. Eta egun, zuzeneko hura oroitzen dudan bakoitzean, irudi hark oraindik hunkitu egiten nau.
Hey, ho, lets go!

**KOLDO ALMANDOZ.** DONOSTIA, 1973
Zinemagilea
www.thebalde.net

## [ 25 ]



## **THE CLASH |** THE CLASH

CBS, 1977

Maiatzaren lehena. Data anbiguoa izan da beti nire buruan. Kapitalismoaren sindikatuen erakusleiho hutsaren eta iraganeko sobietarren propaganda liluragarriaren arteko kontrastea. Ondoriozko globalizazioak ia behin betiko lurperatua zuen ahanzturan egun hau.

Hilabeteak daramatzat azkenean aukeratu nuen diskoari buruz idazteko *prokrastinatzen: The Clash*, 1977koa. Egindako aukerari buruzko zalantzak ere izan nituen, beste aukerak koloristak eta alaiak ziren: Bee Gees gazteak, Electric Light Orchestra edo Pains of Being Pure At Heart liluragarriak. The Rubinoos, Stones Roses, America edo Saint Etienne ere izan zitezkeen aukeratuak. Zeinahi taldek zirudien erakargarriagoa lehen begiratuan. Baina zerbaitek esaten zidan nerabezaroko disko punk hura zela aukerarik egokiena. Estatus ofizialaren aurkako asaldura etengabeari egozten diot: kritika musikalak disko hau ahaztu zuen bat-batean zerrenda handiak egiteko orduan, *London Calling* goraipatzeko. Akademizismoa beti suminaldiaren gainetik, pentsatu nuen. Ezingo dut inoiz musikari buruz arduraz idatzi. Bon, egia esan, ezeri buruz.

Langileen eguna, langile klasearen jaia, borroka eta aldarrikapen eguna, paradoxa berri bat. 2011ko maiatza, bost milioi langabe hauteskunde-barruti honetan. Euskal Herriko ezkerra Zuzenbide Estatuaren botereek zikiratua. Alderdi politikoek isilean egiten diete trufa botere horiei haien amarru endogamiko eta autoindulgentean. Ordezkatzen dituzten pertsonen eskubideak murriztu eta zigorgabe aberasten dira gobernariak. Beatifikatzen duen erlijio bat eta hiltzen duen beste bat. Gaizkia ez dago politikan edo erlijioan, arlo horietan jarduten dutenengan dago akatsa, doktrinaren banderadunengan.

*“Nork behar du Parlamentua, egun osoa eserita legeak egiten, denak dira lodi eta zahar”* (*Remote Control*). Apustua segurua zen. Itxaron besterik ez zen egin behar, gertaerak sor zitezen utzi, begiak ireki eta London SSko punki haiek eta 101’ers-eko okupak –orduan *squatter* esaten zitzaien– berriz entzun.

The Clash nire disko-jogailuan zen berriz eta inoiz baino baliagarriagoa zen mezua errepikatzen zuen, gazteria langabearena, aukerarik gabe, etorkizunik gabe, inolako proiekziorik gabeko lanen monotoniara kondenatua, tiranoen ongizatea gordetzeko ere erabilia: *“Ez dut inoiz bonba-gutunik irekiko zuretzat”* (*Career Oportunities*), lan hori egin baitzuen bere sasoian gitarra-jotzaile Mick Jonesek.

Gaur egun, eskandaluz ikusten dugu nola jartzen diren gure ordezkari politikoak finantza sistemaren menpe eta, azkenik, badakigu dena fartsa hutsa dela: *“Arduratzen diena beren kontu korronteak dira, hori da dena, eta zuk ez duzu inporta”* (*Remote Control*).

Horrek ere gertatu behar zuen, langileen egunaren ostean nire urtebetetzea dator, urteko egunik zoragarriena, baina, jakina, 16 urterekin oraindik ez zen jaieguna, Madrileko hauteskunde-barrutiak ez zidan usurpatu nire maiatzaren bia. Sasoi hartan hauteskunde-mapak definitzen ari ziren, ziurrenik fede onez. Finantza-oligarkia zain zegoen… eta gerrak, gerrak betikoak ziren: *"Dolar yankeeak munduko diktadoreei hitz egiten die, aginduak ematen ditu eta haiek ezin dute hitz bat galtzea onartu" (I'm So Bored With the USA).*

*The Clash* ibilbide musikal oso bat hasi zuen diskoa izan zen. Artistikoki eta pertsonalki hazi eta hazi egingo zen ibilbide batena, mezu argi eta sendoa zuen zirriborroa baino ez zen izan agian, bere katixima. Sex Pistols edo Damneden aurreneko lanen kidea zen, baina talde horiek jaio bezain laster agortu zuten beren mezua. The Clashen heldutasuna osoa izan zen, kideetako bakoitzak bilakaera izan zuen lehen diskoaren aldarrikapenei sekula uko egin beharrik gabe. Aurrera egin zuten talde gisa. Haien ondorengoak ere ez ziren atzean gelditu: Big Audio Dynamite, General Public, Havana 3 A.M., The Good, The Bad and The Queen, Carbon/Silicon, The Mescaleros,… beti fidel haien mezu seminalari: *"Ez dut entzun nahi zer egiten duten aberatsek, ez dut joan nahi aberatsak joaten diren tokietara, oso azkarrak direla pentsatzen dute haiek, oso zuzenak direla pentsatzen dute, baina eskaleek soilik ezagutzen dute egia" (Garage Land).*

Paul Simonon, Mick Jones eta Joe Strummerek, baterian Topper taldekide zutela –1982an utzi zuen taldea–, zimendu sendoko ibilbidea eraiki zuten. Joe, beste gitarrista, 50 urterekin hil zen. Gazte-gazterik Paloma Romero *Palmolive* malagarrarekin Londresko Walterton Roadeko 101a okupatu zuen. Mick Jones musikaria eta ekoizlea da, Damon Albarnekin kolaboratzen du eta P2Paren defendatzailea da; Carbon/Siliconen diskoak ez argitaratzera iritsi da libre zabaltzeko. Paul Simonon baxu-jotzaileak, *London Calling* diskoaren azal historikoan instrumentua puskatu zuenak, arte plastikoetan dihardu, Havana 3 A.M. osatu ondoren.

Nire urtebetetzea zela nioen. Hainbeste urtek gauzak aldatzen dituzte. Egoera 70eko krisi hura baino are larriagoa da. Finantza-oligarkiak ez du onartzen bere irabazien inolako lagapenik. Lehen ez zuten politiko gehienek lapurtzen, gutxi batzuek baino ez. Justiziak inputatutako pertsonak ez ziren hauteskunde-zerrendetan aurkezten. Alderdi politikoak pertsonek gidatzen zituzten, ez enpresa-sozietateek eta korporazioek.

Gazteriaren porrota berbera da. *"Ezin duzu zaratarik egin, ezin duzu aurrera egin, ezin duzu dirurik eskuratu, ezin duzu ihes egin"* (*Remote Control*). *Egizu zuk zeuk* leloa ere bahitu dute enpresek edo independentziaren ikur diren diskoetxeek. Ez dago lekurik ez indibidualismorako, ez parte-hartzerako, ez kudeaketa propiorako, ezta aldarrikapenerako ere. Ez dago independentziarik. *"Botere guztia erosteko gai den jende aberatsaren eskuetan, gu kalean paseatzen garen bitartean, saiatzeko koldarregi… matxinada bat nahi dut… nire matxinada nahi dut!" (White Riot).*

Armak aldatu dira, eszenatokia bera da: kalea.

Gure seme-alabak amets burgesetik, lozorro *indie*-tik esnatzen direnean, Titus Andronicusek energia borrokatzeko eta ez hiltzeko erabiltzen duenean, asmamena sare sozialetatik kanpo erabiltzen hasten direnean, eraso zibernetikoak haien auzoetan jarritako barrikadekin sastakatzen dituztenean, beren boterearen jakitun direnean, 2.0 komunikazio sozialak eta justiziaren indarrak lortzen duen bultzada osoarekin, orduan, espero dut hamalau tiro hauek, The Clashek 1977an deskargatu zituzten hamalau amorru eta salaketa mezu hauek –sentimenduak, errepresioa, terrorismo instituzionala, matxinada, gorrotoa eta gerra, identitatea, gezurrak, ergelkeria, lana, iruzurrak, sexua, bakea eta integritatea eta duintasuna– aurrerabidearen gizarte justuagoa eraikitzen laguntzea, partehartzean, berdintasunean eta elkartasunean oinarritutakoa eta, lortu dutenean, ahotsa goratu eta azaldu egin beharko diegu haiei hainbeste ukatu genuen *No Future*-rik txarrena eskaintzera eraman gintuztela autokonplazentziak eta anbizio zakarrak.

**CERILLAS GARIBALDI.** BILBO, MADRIL, 1963
Musikazalea
discosgaribaldi.com

[ 26 ]

## **BELAR HOSTOAK |** TXOMIN ARTOLA

Xoxoa, 1978

**DARDARA GAZI-GOZOAK**

**Aura plastifikatuak.**- Ezin ekidin, batzuetan hanpatsu izan behar da eta maiuskulekin idatzi, batez ere kontu hutsal eta ñimiñoei buruz idaztera goazela. Hutsala, esangurarik ez duena, bazterrekoa, bakarrik lau zorori interesatzen zaiena, diskoak adibidez, musika ontziratzen den direlako horiek. Hutsalak, esangurabakoak, desagertzera doazenak.

Jar gaitezen, ba, hanpatsu, maiuskulei tiraka. Parrasta Handiaren Aroa bukatzen ari dela bizi gara oraingoan. XX. mendean ezagutu dugu Kontsum(ism)oaren Gizartea eta horrek ekarri du Pop Kulturaren eztanda. Ordu arte objektu artistikoak elite txiki baten gutiziak ziren, jende gehienari debekatuak zitzaizkion gauzak. Ezta pentsatu ere! Ezta sentitu ere!

Baina Petrolioak garraioa ekarri zuen, Garraioak mugikortasuna, Mugikortasunak lehengaien ugaria, Ugariak merkantzia eta Merkantziak merkatua eta Merkatuak bezeroa, eta Bezeroek berri nahia, eta Nahiak produktua. Baina Nahiak esanahia esan nahi du. Eta esanahiak produktua sinbolo bilakatzen du. Merkatu sinbolikoa balizkoa izan denean jendearen kontsumoak pop kultura topatu du.

*You say pop and no stop*, iragarki lerdo baten lelo hutsala. Baina ze polita ñimiñokeriak hanpatsu handien berba burbuila akatzen duenean. Walter Benjamin gizajoa eta bere Frankfurteko koadrila osoa eta atzetik etorri diren enterau guztiak ederto tronpatu ziren esan zutenean Artea ezinezkoa zela Kopia Errazaren Aroan, Artelanaren Aura galdu egiten zela kopia egitean. Putza! Gaur egun *artista* baten putzak ere aura du!

XX. mendean Petrolioak bultzatutako Parrasta Handiaren Aroak bi Objektu Auradun mota nagusi zerbitzatu digu: Automobila –nork bere boterea, ahalmena, azkartasuna eta *sexytasuna* erakusteko eta mundua kutsatzeko eta daukagun baliabide preziatuenetakoa alferrikaltzeko diseinatua dagoen masa hiltzaile hori– eta Diskoa –gizakiak betidanik eduki duen hausnarketa, sentimendu eta emozioen pizgarri handiena, musika, ontziratzeko balio duen dispositiboa, gainera, Petrolioaren azpiproduktu batez, plastikoaz, fabrikatua–.

Gizarte post-fosilista baterantz baldin bagoaz –eta hala dirudi, mileniotan eguzkiak oparitutako baliabide preziatu hori, Petrolioa, mende bakar baten, Parrasta Handiaren Aroan, desagertzeko moduan utzi baitugu–, objektu auradun horiek inoiz baino desiragarriagoak bilakatuko dira, geroz eta urriagoak direnean, egoeraren larritasunak kontrako erreakzioa, errefusa eta mespretxua sortzen badu. Agian gorroto hori kotxeen kontra bideratuko dute hurrengo belaunaldiek. Eta diskoak –hala nola, bizikleta estatiko bat mugiaraziz energia elektrikoa sortu ahal izango baitute, disko jogailu baten funtzionamendua eragiteko lar–maite izango dituzte oparotasun sinbolikoaren aro baten azken aztarna gisa, apika. Apokaliptiko samar, ezta? Epe ertaineko profeziak egiteak abantaila du: ni ez naiz bizirik egongo hau egiaztatzeko, ezta zu ere. Eta galletak kafean busti bitartean irakurtzeko moduko liburu hutsal hau nork gordeko du?

Buelta gaitezen hutsaltasunera, beraz, utikan apokalipsia! Kontua da, orduan, disko batzuek aura dutela, jende askorentzat kasu batzuetan, gutxi batzuentzat beste kasu askotan. Baina auraz aparte, disko batzuek esangura dute, indar sinbolikoa, eginak izan diren gizartearen nahiak, frustrazioak, arazoak eta amets kolektiboak islatzen dituzte. Edo behintzat horrela irakurriak izan daitezke. Hori egitera goaz Euskal Herrian Parrasta Handiaren Aroko bi momentu esanguratsutan sorturiko bi disko hutsal eta ñimiñorekin, tramankulu horiek utzitako arrastoak, balego, zer edo zer esaten digulako munduko leku horretan garai horietan gertaturikoari buruz.

Garai horietan munduko leku honetan Euskal Herria berpiztu zen. XX. mendeko 60ko hamarkadan euskara eta euskal kultura desagertze prozesu azeleratu batean zeuden, alde batetik estatu frantses jakobinoak bere asimilazio eta homogeneizazio lanean ziharduela eta, bestalde, estatu espainol frankistak bere ukatze eta baztertze lanak bukatzear zituela zirudienean. *Euskal* markapean bakarrik folklorea geldituko zela argi eta garbi ikusten zen. Baina Euskal Herria kontzeptuaren inguruan identitate kolektibo indartsu eta historian aldakor –eta areago eraldakor, etnizitate guztiak bezala– bat mantentzen zen gizartearen hainbat arlotan (momentu horretan galtzaile eta zapaldua izanaren kontzientzia argia zuen jende askorengan, batez ere Hegoaldean) eta urte horietan jende



horrek erreakzio azkar eta ahalmentsua eragin zuen, euskal nortasun horren birdefinizio osoa sorraraziz. Eta garaian garai nazioarte mailan eratzen ari zen Pop Kulturaren baliabideak oso inportanteak izan ziren birdefinizio horretan. Horra hor pop musika, eta diskoak, kontsumo musika eta musika herrikoiaren arteko mugetan murgiltzen dena, prozesu horretarako lanabes ezinbestekoa.

Prozesu horren historia egiten ari gara Euskal Herrian oraingoan –eta agian bere isla musikalarena ere egin beharko dugu, nonbait– nolabait ixten ari den sentsazioa gailentzen den une honetan. Baina hemen orain prozesu horren bi momentu ilunabarrekotan, bi disko ia hutsal, apenas arrastorik laga ez dutenek islatzen dizkiguten bibrazioak, dardara gazi-gozoak, plazaratu nahi ditugu, esanguratsuak direlakoan, nahiz eta ziurrenik kanta horiek, Batty erreplikanteak negar egin moduan, malkoak euritan legez galduko diren.

**Alpalpa eta pagotxa eta abarreko belarrak.**- 1978an hippy izan zitekeen Euskal Herrian, nolabaiteko *love summer*-a usaindu egiten zen. Frankismoa hiltzen ari zen eta gero espainiar demokrazia izango zena jaiotzen ari zen. Euskal Herrian urteotako lan identitarioa emaitzak jasotzen ari zen, euskal kultura pil-pilean zegoen Artziniegatik Mithikileraino, Tafallatik Lekeitioraino, gazte urbano askok uda baserrietan ematen zuen euskara ikasten eta alpalpa artean, neska-mutil baserritarren pagotxak dastatzen, ingurune horretan berriak ziren beste belar batzuekin batera, musikari aurreratuenek euskal melodiak folk eta jazzarekin nahasten zituzten eta ondorioa *enrollatua* zen, presoak kalera ari ziren eta bizirik gelditzen ziren borroka sozialek ere halako puntu kosmikoa zuten: nuklear izuaren kontrako mobilizazioa nagusi zen herri eta kaleotan.

Hondarribian bazebilen halako hippy ilustratu eta ibilitako bat: Txomin Artola, bertako arrantza munduaren kantaria izandako familiako semea, korritua zuen ingeles lurra bere gitarrarekin, goizeko euri eta arratsaldeko epelaren artean, etxera bueltatzean banjoa eta kontrabaxua jo zuen sekulako ospea eta itzala zuen belardiko kantariaren disko abangoardistetan eta Haizea izeneko folk taldea antolatu zuen zenbait lagunekin, Pentanglek eta Fairport Conventionek egiten zuten moduan euskal tradizioko doinuei soinu bizigarria emateko. Baina urte horretan pauso bat harago eman zuen eta Ipar Euskal Herrian sorturiko rock talde potenteena liatu zuen Ameriketan Dylanek asmaturiko folk-rock soinu urduria Euskal Herriratzeko.

Errobi ken Anje Duhalde berdin Mixel Ducau gitarran, Beñat Amorena bateerian eta Jean Phocas baxuan; gehitu Robert Suhasen teklatuak eta Artolar sendiaren koruak, Txominek berak kontrabaxua, xilofonoa, flauta, pianoa eta batez ere gitarra eta harmonika. Jaka zuria eta betaurreko beltzak, fenderra eskutan, Txomin Artola Urkiolako Aekanpadan, hantxe ikusi zen Euskal Herriko Woodstock bat izan zitekeena. Hori baino lehen, diskoak *Belar Hostoak* eduki zuen izena.

Letrak Walt Whitman poeta estatubatuarrarenak ziren, Lupe Artolak eta Juan A. Letamendiak euskaratuak. Izan ere, Whitman baino hippyagorik ez dago, beti esan da XIX. mendeko kantorearen itzala handia izan zela *beat generation* delakoengan –Ginsberg, Ferlinghetti, Kerouac, Corso, Snyder eta enparauengan– eta hauen bitartez poesia eta folk-rocka uztartu zuten guztiengan. Baina Whitmanek naturaren indar telurikoari eta gizakiaren botere kosmikoari kantatzen dio, demokrazia eta edertasuna goratzen du mugimendu berean. Dena da baikor, dena da ahalguztidun eta zoriontsu bere poesian. Artolak eta Whitmanek pagotxa eta alpalparen artean sentitzen diren dardara goxoak sumatzen dituzte, baina aldi berean lur osoaren erasoek ezin suntsi zezaketen hiria amesten dute, izar guztien bibrazio kosmikoa jasotzen dute hondartzan, eta sentipen eta gogoeta horiek pertsona guztienak direla. Dena posible denean –bere independentzia eraikitzen ari zen Ipar Amerikan, askatasuna dastatzen ari zen Euskal Herrian– *"orotan dago agian z(g)ure bidea, uretan eta legorretan, z(g)ure bidea"*. Ez omen gara espazioa, ezta denbora ere.

Eta Errobi taldea (ken Anje) ez da inoiz disko honetan bezain distiratsu aritu; Mixel Ducauren gitarrek zerua ukitzen dute, pleiadeak eta Jupiter ferekatzen dituzte, Jean Phocasen baxua lurrera ainguratzen da eta Beñat Amorenaren danbor eta platerak trumoiak eta haizearen txistuak dira. Artolaren umeek koru argitsuak eskaintzen dizkiote hiriari, soroetan bele ibili baino askoz lehenago. Eta aitaren ahotsek eta doinuek uda betikotzen dute, argia jostari.

Jakina, uda laburra izan zen hura Euskal Herrian. Eta negu gorria etorri zen. Baina hori beste istorio bat da. (Belar Hostoak diskoa CDan topatzea erraza da gaur, Elkarrek *Egin Diskoteka* sailean berrargitaratu zuen aspalditxo baina Liburu eta Disko Azoketan, merkealdien salmahaian oraindik geratzen dira aleak. Guerssen Lleidako diskoetxeak biniloa berrargitaratu du oso edizio txukunean eta soinu ederrarekin).

**Eromenaren mugak.-** Bai, negu gorria etorri zen, eta zulo beltza bilakatu zen hainbat momentutan. Izu nuklearraren kontrako borroka bi intrantsigentziren arteko talka odoltsua bilakatu zen, euskal kulturak hiri txokoak deskubritu zituen, beilegi biziaz jantzitako kale garbitzaileak eta abar. Euskal Herrigintzak bi norabide kontraesankor hartu zuen: alde bat erakundetu zen eta alpalpa eta pagotxa porlanez berdintzera dedikatu zen; bestea gotortu eta militartu zen, eutsiezina zen gerra dinamika bat elikatuz. Azken alde honek, alta, lagun eta arrazoi eduki zituen urte horietan agertu ziren beste fenomeno batzuk: birmoldaketa industrialak langabezia izugarri goratu zuen eta estatu espainol birfundatu berriak erabaki zuen gainbizitzen zen aparatu errepresibo bortitzak euskal erresistentzia oro *manu militari* deuseztatu behar zuela. Durangoko literatur fanzine batean idatzi zuten moduan: “Euskadi, el país menos movido, el que no está parado está detenido”. Errebolta baino ez zen geratzen, Euskal Herriak punka behar zuen eta gazte jendeak asmatu egin zuen.

2008an berriz, olde hori akitua zegoen. Parrasta Handiaren Aroaren azken fasean *low cost* gizartean murgildu ginen. Dena merke, dena eskuragarri, dena kontsumigarri, faktura epe eroso batean ordaindu. Eredu horrek krak egin zuen urtean Lazkaoko mutil (beno mutil, berrogei urteren mugara hurbiltzen diren *gazte* horietakoak) koadrila batek bekokian seko kolpatzen zaituen disko horietako bat atera zuen: zuzena, gordina, punkya, baina klarinete soinuekin, lehorra bezain mamitsua, esperantzarik gabea, denborek agindu bezala.

Artolak (ez Hondarribiko senidekoa), Aldanondok, Jesulinek, Zangituk eta enparauek disko umila baina zehatza erditu zuten, punk eta oi! soinuetan karrera luzea eta diskretua osatu ondoren. Brigada Criminal eta beste taldetako partaideak batu eta betiko raka-rakatik harago doan rock eta folk klasikoaren distilazio ia-perfektua ondu zuten: Irlandako punk-folk alkoholikoaren aireak, Johnny Cash anfetaminikoenaren patxara eta merkurio basatia darien gitarra erritmikoak. Ez dago aurkikuntza berezirik, ez dago estilo berririk, bai soinu distiratsua eta tentsiozkoa, herra apaldu batek gidatzen du kanten progresioa. Orain dela urte batzuk Bruce Springsteen mega-izarrak, Pete3 Seeger gogoan, Ipar Amerikako langileen ereserkiak biltzen zituen disko borobila egin zuen. Baina hori arkeologia musikala zen, Fiachrasena antropologia soziala da.

Eta letrek punketik datorren amorrua eta bizitzatik jasotzen den nekea eta malenkonia islatzen dute. Gaztelaniaz eta euskaraz, gaur egun euskal kaleetan mintzatzen den modu autoglotofagiko horretan hemen beti krisia dagoela adierazten dute. Ez dagoela jadanik ametsetarako tarterik, *pitxu* ajeak direla autentikoenak, gazte denbora doala eta prekariotasuna eta zalantza existentzialak baino ez direla geratzen. Ahazten ikasi nahi genukeela, behar dugula, baina zulo beltzenean aurkitu ahal dugula nahi genuena. Krisia erabatekoa da, afektiboa ere bada, maskulinitate mindu bat agertzen da zenbait letra barnerakoitan. Eta babes gabe gelditu den langile klasearen *ostitxarra* besteetan. *No Holidays In Bardulia.* Euskal Herriari gaur egun dagokion diskoa egin zuten Lazkaoko *pringau* hauek eta parranda amorratuaren erlijioa predikatzen dute, noizean behin, hortik zehar. Ez galdu aukerarik

eurekin mozkortzeko (Bonberenea Ekintzak zigiluak atera zuen diskoa eta 2011n beste bat argitaratu diete).

**JOSU LARRINAGA.** SODUPE, 1964
Musikazalea

## [ 27 ]

## **THIS HEAT |** THIS HEAT



Piano Recordings, 1978

Duela ia hogei urte, internetek gure bizitza eraldatu baino askoz lehenago, amets egiten genuen etengabe eta gure burutxoari buelta eta buelta eragiten genion izen mordo batekin, bigarren edo hirugarren belaunaldiko artistek uneoro aipatzen zituztenak, baina artean guk inoiz entzun gabekoak, gutariko baten anaiak edo ezagunak Alemaniara edo Ingalaterrara joateko aukera zuen arte, bere ogerlekoak hartuta eta freak bildumazalearen genea odolean. Une horretantxe, *tape*-ak –kaletarron hizkeran *zintak*– grabatzeko prozesua abiatzen zen, eta arnas batean, –tira, batzuetan prozesua moteltzen zen grabatzaileak hartutako sustantziak zeintzuk eta zenbat ziren–, zure esku zegoen altxor preziatu hura, hori bai, soinu ezin kaskarragoarekin.

Horrelaxe entzun nuen lehenengo aldiz This Heat taldea, Londresko hegoaldean 70eko hamarkadaren erdi-amaieran eratutakoa, eta merezimendu handiz goraipatua. Thatcherren Ingalaterra agortezinean sortu ziren talde guztien arteko pertsonalenetako bat eta itzal handia utzi zuenetako bat zen. Hasiera batean, 1976an, bikote bat zen taldea: Charles Hayward bateriaz, teklatuez eta ahotsez arduratzen zen, eta Charles Bullen gitarraz, klarineteaz eta ahotsez. Baina behin betiko formazioa Gareth Williamsek ezarri zuen 1977an, eta baxuaz, ahotsez eta organoaz arduratuko zen.

1979an testu honen ardatza den disko kintaesentziala grabatu zuten, kontzertu gutxi batzuk jo –zoritxarrez ez zuten oso sarri jotzen– eta entsegu ugari egin ondoren; areago, kantuetako asko entsegu-lokalean bertan grabatu zituzten. Ororen gainetik esperimentazioa eta *avant-garde*-a nagusitzen da, ez soilik arlo musikalean, baizik eta grabatzeko moduan ere, arlo horretan ere aitzindariak izan baitziren; baina musika xamanikoaren, rock progresiboaren, psikodeliaren eta krautaren elementuak ere badaude. This Heaten musika izugarrizko arte-collagea da, mugarik ez duen musika, sentsazioen katarsia, eromena eta burutik pasa ahal zaizkizun gauza guztiak. Beren eragin nagusia Faust taldearen lehenengo diskoetan badago ere, ingeles peto-petoen erara, 60 eta 70eko hamarkadetako anglosaxoien ondare zabal-zabaletik edan zuten eta beren iragazki propiotik pasatu zuten, soundscapeak barra-barra erabiliz, literatura bizarroa, kaseteak manipulatuz, erritmo gihartsuak eta musika konkretuaren zantzuak.

Beren bigarren eta azken albuma, *Deceit* izenekoa, bi urte geroago atera zuten, 1981ean, baina beste artikulu oso bat merezi du. Tamalez, handik gutxira zapuztuko zen talde paregabe honen ibilbidea, baina modu kontzientean edo inkontzientean utzi duen arrastoak *underground* unibertsoaren zabalean dirau 30 urte geroago.

**AITOR GUEZURAGA.** MADRIL, 1977
Musika banatzailea
atmosferabrupta.com

[28 ]



## **ANTHOLOGY |** JANIS JOPLIN

CBS, 1980

Nire bizitzari soinu banda bat jarri beharko banio, Janisen kantuek toki berezia izango lukete bertan. Musikarekiko interesa haurtzaroan sortu zitzaidan arren, urte batzuk geroago lortu nuen lehenengo musika ekipoa, diskoak aukeratzeko sorta zabala baina diskoak erosteko aurrekontu urria nuela.

Garai hartan oso ezaguna bihurtu zen nire auzoan irrati pirata bat, eta auzoko gazteok txandak egiten genituen behar zen edozein gauzatan laguntzeko. Gure nebak, bertatik sarritan ibiltzen zenak, diskoak ekarri ohi zituen etxera maileguan, besteak beste, Jimi Hendrix, Lou Reed, Iggy Pop, eta Joplinen bilduma disko bikoitz hura.

Lehenago ere entzun nuen hari buruz, Woodstock, neurrigabekeriak... Bere itxura hippyak erakartzen ninduen, baita bere jarreretan antzematen zen asaldurak ere; baina bere musikari ez nion inoiz arretarik eskaini... eta *Anthology* pintxatu nuenean... Oh my god!! Zer zen hura? Jakina, kontzentrazio handiagoa merezi zuen, ama inguruan xurgagailua pasatzen ari baitzen, eta neba txikia korridorean baloiarekin jolasean. Gaua heldu arte itxaron nuen eta denak lotan zeudela egongelako atea itxi nuen, nire burua baino handiagoak ziren entzungailuak jantzi nituen eta Janis unibertsoan zehar abiatu nintzen.

*Piece of My Heart*, ordura arte ez nuen entzun inor horrenbesteko indarrez garraxika, zarraztaka, literalki bihotza erauzten ari balitzaizkio bezala.

*Summertime*, Gershwinen kantuaren bertsioa; suposatzen dut nik ez nuela oso argi bluesa zer zen, baina itxura basatiko neska zuri eta hauskor hark filmetako beltzek bezala abesten zuen.

*Little Girl Blue* kantuak larruazala lazten dizu lehenengo notatik, eta hitzetan agertzen den neska bezain triste sentiarazten zaitu; ziurrenik bere buruaz arituko zen Janis.

Ez nekien oso ondo nola barneratu entzuten ari nintzen musika hura guztia, baina, zalantzarik gabe, inork ez ninduen ordura arte modu horretan hunkitu, berak kantatuz hunkitu ninduen bezala, gorputz eta arimaz.

Ez dakit zer ordutan oheratu nintzen, zenbait kantu hamaika aldiz entzun nituen... baina, zer demontre gertatu zitzaion emakume horri horrela kantatzeko? Beranduago ulertuko nuen: minutu eta nota bakoitza azkena balitz bezala bizi eta kantatzen zuen. Horrelaxe iradokitzen digu *Get It While You Can* kantuan: "ahal duzun bitartean lor ezazu" esaera azken hariraino eraman zuen, dena nahi zuen eta, nahiz eta ziur aski berak ez jakin, gutariko askoren ustez lortu egin zuen.

**EVA GONZÁLEZ.** BILBO, 1967
Musikazalea

**[ 29 ]**

## SANDINISTA! | THE CLASH



CBS/Epic 1980

**1.**
Mundu eskuragarri eta konektatuaren fantasia historikoak, globalizazioaren forma ideologikoa bereganatu aurretik, *internazionalismo* izenean izan zuen gorpuzte politikoki aktiboa. Inork ez zuen orduan imajinatzen termino hori laster baztertua izango zela. Internazionalismoaren diskurtsotik globalizazioaren erreferente berrirako iragaitea, errestaurazio neoliberala proposatzen zuen mundu-ikuskeraren aldaketaren zeinu kondentsatu modura proposa genezake. *Thatcherismoa* indarrez agertu zen 1979an. Reaganek norabide aldaketa sendotu zuen 1981ean. Bi urte horien artean, 1980an, The Clashek disko hirukoitza grabatu zuen *Sandinista!* titulu adierazgarriaz (eta CBSri katalogoan albuma identifikatzeko FSLN-1 erreferentzia kolatzeko keinua eginaz, garaipen pirrikoa hura!) eta ez zen izan ezer berriren hasiera, ulertarazi nahi izan den bezala, baizik eta amaiera. Zerbait berriaren amaiera.

Ordurako, punk sentsibilitatea kolonietako musika-kulturetara, gehienbat karibeko immigrazioaren bidez, zabaldu izanaren ardura, hein handi batean, The Clashena bazen ere, *Sandinista!* diskoari esker sentsibilitate hura forma koherente bilakatuko zen. Zeinu politikoa. Orduan utzi zion metropoliko hiritar berrienen exotismorako jite izateari, hibridazio-egitasmo kontziente bihurtzeko. Hip-hopak bat egiten du disko hirukoitz horretan ordurako jorratuak zituzten ska, reggae eta dubaren esparruekin. Fusioaren ideia horrek topikoa dirudi, ondorengo urteetako desideologizatze-prozesua Troiako zaldi gisan lagundu zuen proiektu musikala *world music* delakoa izan baitzen, hots, munduko musika, esan gabe doa, *gainerako* munduko musika.

*Sandinista!* ez da, hortaz, kultur-aniztasunaren gogo akritikoa aurreratzen duen diskoa, baizik eta epitafio goiztiar moduko bat internazionalismoaren proiektu politikoa mainstreamean txertatzeko diskoak berak sortutako aukerari.

1980a hasi baino lau egun lehenago, sobietar armadak Afganistaneko gobernu sozialistari CIAk finantzatutako muyahidinen aurka ematen zion babesa inbasio bihurtu zen ofizialki. Egun horretan bertan, The Clashek kontzertu benefikoa eman zuen Londresen, Kanbodian Pol Poten erregimena eroritakoan Thailandiara ihes egiten ari ziren errefuxiatuei laguntzeko. Hamarkada berriaren hasierak historiaren bilakaeran aldaketa bat inposatu zuen, gure garaikidetasunaren errelatoaren fundatzaile izanen zena. Errestaurazio aro bat. Imajina liteke, fikzio historiko gisa, ekintzen eta interpretazioen bestelako bilakaerarik, The Clashen aholku tolesgabeak lagunduta, munduko txoko guztietako gatazka bakoitzaren garrantzi erabakigarria begi bistatik ez galtzeko.

2.
*Sandinista!*, bestalde, oso disko *estatubatuarra* zen. Ia disko osoa New Yorken grabatu zen, eta hiri horri eskaini zioten abesti bat, talde zuri batek grabatutako lehenengo rapa izan litekeena. Keinua profetikoa zen. Abestiak ez zuen asmo profetiko hori, nahiz eta bere titulu iradokitzaileak apokalipsiaren geroko ikuspegiak pentsarazten dizkigun. *Lightning Strikes (Not Once, But Twice)*. Tximistak jotzen du (ez behin, baizik eta birritan). Afganistanetik New Yorkera eta buelta. Historia ez zen amaierara heldua, ez horixe.

3.
Ustekabeko ondorio txiki modura, The Clashek internazionalismoaren proiektu politikoarekin izan zuen identifikazio argi hark lagundu zuen, lau urte geroago, euskal gazteen belaunaldi oso batek punkaren paradigma estigma deserosoen aztarnarik gabe asimila zezan; Kortaturen *Nicaragua Sandinista* kantua lasaigarri zitzaien, lehentasun handiagoko determinazio ideologikoei leial jarraitzeko. Ortodoxia abertzalearen mesfidantza uxatuko zuen bermea zen, fenomenoa hasieran lumpentzat hartua izatetik amaieran identifikaziozko irudikari komun baten tolesik gabeko eraikuntzan ofizialdu zen arte. *Sandinista!* album hirukoitzak inflexio puntu historikoa ekarri zuela argudiatzea metafora gisa baino defendatu ezin bada ere, Euskal Herriko irudikapen politikoaren historian duen esanahiaren kasu konkretuan, bere posizio angeluarra eta eragin zituen ondorio zuzenak oso errealak eta zehatzak dira. Ustekabeko une eta lekuan izan zen arren, musikaren bidez gauza konkretuak aldatzeko helburu ustez inozoa bete zuen.

4.
Beste nonbait adierazi izan dudan bezala, Clash irudikaria eraikitzen duten estrategia sinboliko paragerrilarien azken eduki erreala taldearen gizon-anaitasun kodean inplizitu dagoen gozamen libidinala da. Taldea ekinean. Ekinak eraikitako taldea. Bigarren mundu gerraz eta gerra parafernaliaz zuten liluraz galdetuta, erantzun itxuraz saiheskorra eman zuen Paul Simononek, hirurogei eta hirurogeita hamarreko hamarkadetako gerra-pelikulekiko zuen pasioari egotziz, bereziki bigarren gerra handikoei. Erantzun horrek, lehen aipatutako

benetako koska ulertzeko gakoa ematen zuen, ez zuen bere konpromiso maila ezkutatzea helburu. Simononek aipatu zituen film horien guztien abenturak narratzeko era berbera da funtsean: gizon arnegari, moldatu gabe edo zokoratuen talde batek, leialtasun, fideltasun, traizio eta erredentziozko dialektika erakusten du, banakako gaitasunen akzio bateratuaren bidez. *The Dirty Dozen*-etik hasita *Kelly's Heroes*-era.

Bere kode propioa eratzen duen talde baztertuaren fantasia horretan, Clash taldea zen giza talde problematikoaren errealitatea nahastu egiten da giza talde horretatik eraiki zituzten fikzioekin. Halabeharrak nahi izan zuen elementu horiek guztiak protagonisten biografietan elokuenteki konbina zitezen. Taldearen banaketa traumatikoaren ondoren, baina berak utzitako ondare estetiko-politikoarekin bat eginez, Alex Coxek 1987an egindako pelikulan parte hartu zuen taldekide bakarra Joe Strummer izan zen. The Clashen abesti baten izena zuen: *Straight To Hell.* Spaghetti western eldarniozko hartan, garaiko punk britainiar eszenako kide ugari agertzen zen. Zantarkeria neurrigabe hartan musikariek lapur marjinalen talde bat antzezten zuten, lehen aipaturiko generoaren fantasia guztien erdian.

Ez zen oso bestelakoa, asmoen bakuntasunari begiratuta, Clasheko kideek beren garairik onenean grabatu zuten film labur amateurra, *Hell W-10* izenekoa, non West-Endeko lapurrarena egiten baitzuten. Londresko infernua Almeriako basamortua bihurtu zen, bertan grabatu zuten Coxen filma, modu inprobisatuan; izan ere, musikariak (Elvis Costello edo The Pogues barne) elkarrekin han geratu zirela aprobetxatu zuen zuzendariak, non eta Nikaraguan antolatutako bira bertan behera geratu zenean.

Gobernu sandinistaren mesfidantzak izan omen ziren programatutako bira pikutara bidali zutenak. Ez dut inoiz egiaztatu, baina *si no è vero*, *è ben trovato*. Urte hartan, Cox eta Strummer beste zinema-proiektu askoz konplexuago eta kontzienteago batean murgildu ziren: *Walker*. Joe Strummerrek soinu banda osoa idatzi eta aktore moduan paper bat egin zuen. Filmak abentura belikoen generoari buelta ematen zion. Gerraren koartada historikoaren bidez anaitasun eta adiskidetasun istorio huts bat kontatu beharrean, oso kritika politiko egokia osatu zuen zenbait filibustero moldakaitzen istorio itxuraz hutsalaren bitartez. Filmeko pertsonaiek, hemeretzigarren mendeko protopunk itxurarekin, *Straight To Hell*-eko desklasetuen karikaturak ziruditen patina historiko batez margoturik. Horren ordez, William Walker filibusteroak, Ipar Amerikako finantza-kapitalak lagunduta, mertzenario talde batekin Nikaragua inbaditu eta 1856an herrialdeko presidente autoizendatu zeneko kapitulu historikoki zuzen (baina probokatzaileki akastun) bat berreraiki zuten. Iparramerikarrek Erdialdeko Amerikan egin zuten esku-hartze kriminalaren erdian filmatutako film hura zazpi urte lehenago The Clashek gai horri eskaini zion albuma baino keinu militante etsituagoa zen, ezinbestean.

**ASIER MENDIZABAL.** ORDIZIA, 1973.
Ikusizko artista

[ 30 ]



## ALTABIZKAR - ITZALTZUKO BARDOA
BENITO LERTXUNDI

Elkar, 1981

Gure arrebaren domeketako Tea eta Pastatxoen Clubak disko bati buruz idazteko eskatu zidanean hor geratu nintzan zer hautatu jakin barik. Hainbeste urte jada musika entzuten gabizela… Madonna, Motörhead, Monteverdi, Kortatu, Hilliard Ensemble… (bestela begiratu gure arrebaren idazkia liburu honetan). Nola egiten daben ihes hareak atzaparren artetik…dxxx….

Pentsatzen hasi eta nik, errenazimendu eta barroko garaiko musika instrumentu egile bezala (batzuk *luthierra* esaten dutena), beti galdetu diot nere buruari nondik datorkidan gaur egun ogibide dudan zaletasun/behar hau. Duda barik, arrazoietako bat, egiten ditudan instrumentu horien soinu, tinbre edo *sonoritatea* da, nire arkadia pertsonalaren soinu banda izan daitekeena.

Arkadia hau ez da Sannazarorena, Campanella edo Lazarragaren Dianean agertzen dena, edo agian bai (horietan agertzen den natura, izan zitekeen Nafarroako edozein erreka ertz, ”*Oihan beltzian pagua…*”).

Noiz eta zein musikarekin hasi nintzen kontzeptu horri forma ematen? Ba, egia esanda ez dakit. Idazki honetarako diskoa hautatu nuenean, biniloa fisikoki bilatzen hasi nintzen gure aitaren diskotekan eta orduan konturatu nintzen etxean ere entzuten zela *sonoritate* hori. Gogoratzen ez nituen *antzinako musikaren* lan batzuk topatu nituen, Vivaldiren *Viola d’amore* kontzertuak, mandolinarakoak edo Burgosko fraileak gregorianoa abesten.

Eta beste gauza askorekin nahastuta han dago Benito Lertxundiren *Altabizkar/ Itzaltzuko bardoari* LP bikoitza, Elkarrek 1981ean argitara emondakua.

Hau entzuten gendunian umeak ginan, udan Euskal Udalekuetara juaten ginanak, Goñira, orduan oso urrun zegoen Nafarroara. Han, gabero, jantokiko sutondoan, Jesus Mari Arrietak Itzaltzuko Koblakariaren istorioa kontatzen zigun atalka (eskerrak orduan ez neban istorio dramatiko hori ondo ulertu). Dxxx… jope, haria ze bizkor doian atzaparren artian…

Lan hau Orreagako gudari buruzko disko kontzeptual bat deitzen dabena da (*Itzaltzuko bardoari*-ren B aldea ezik agian, non, *por zierto, euskal* musikaren abesti klasiko batzuk dauden, *Nere herriko neskatxa maite edo Oi ama Euskal Herri* (ehuneko ehun Benito Letxuginni!).

XVII eta XVIII. mendeko hitzak, non Oñaz jauna, Karloman eta Dotze Pariak XVIII. mendeko Nafarroako gorteko himno batekin nahasten diren. Imajina daiteke norbait urrunean adarrari putz egiten gudarako deia zabaltzen (Gure He-

rria, Nafarroa arrotzen eskuetatik askatzeko!). Euskal Epikaren adierazpide bat (ondiokan gaur egun hori zer arraio dan jakin barik, neuk behintzat). Hori bai, ezin da ahaztu zein garaitan argitaratu zen, 80ko hamarkadako hasiera beldurgarri haietan. Eta harea atzaparren artean ezin estututa…dxxx…

Instrumentazio aldetik ere horrelakoa da, nahaste eder bat instrumentu modernoak eta antzinakoak erabiliz, benetan atmosfera eder eta interesgarriak lortzeko. Hor dagoz harizko/soka arreglo politak, eta gitarraren batean Milan edo Dowlanden lautea ere entzun daiteke. Benitok badaka besteren musikak beregana integratzeko arte haundixa.

Euskal *hippie-rock* talde batzuek hemengo instrumentu tradizionalak erabili zituzten bezala seguruenik lehen (eta azken?) aldiz agertzen dira euskal musikaren grabazio batean antzinako instrumentuak, ganbako biola, kromornoa edo espineta. Lan honek ere badaka (ero niri hala iruditzen jata) loturarik 70eko hamarkadan Ingalaterra edo Alemania aldean agertu zen *Medieval Folk Rock*-arekin (Gryphon, Ougenaide, Lilienthal…).

Neretako, ondiokan be zati batzuetan sekulako indarra dakan aspaldiko disko bat. Eta harea badoia, dxxx, erdia eskuetan ta beste erdia zapaten gañian zabalduta…

**ANDER ARROITAJAUREGI.** EIBAR, 1973
Luthierra
web.jet.es/arroitaja

**[ 31 ]**

## GOLD UND LIEBE | D.A.F



Virgin, 1981

Ez diot inoiz erreparatu zergatik gehien atsegin ditudan kanpoko musika taldeen izenak nire pentsamenduaren aurkakoak diren. Edo hobeto esateko, izen horiek dituzten adiera desberdinek eta batzuetan kontrajarriek, harritu eta pentsaeran desoreka azalarazten didate. (D.A.F., New Order, Prince...). D.A.F. (Deutsch Amerikanische Freundschaft). Izen hau euskaratuko bagenu, A hirukoitza aterako litzaiguke: Anaitasun Alemaniar Amerikarra (AAA). Sigla horren azpian dagoen aipatu izena inoiz ez da existitu, bai, ordea, beste batzuk benetako adierarekin. A hirukoitzaren siglek beldurra eragin zuten estatu terrorismoaren estolderietako gune biziak baitziren. Bi izan ziren ezagunenak, Alianza Anticomunista Argentina eta Alianza Apostólica Anticomunista, estatuaren mendeko talde terrorista eskuindarrak, 70eko hamarkada hasieran (Argentinakoak) eta bukaeran (Espainiako Estatukoak) jardun zuten. Japonian ezaguna da poparen alderik alaienak eta doinu ilunenak nahasten dituen AAA taldea

(Attack All Around). Gustuko ez ditudan taldeen izenekin segituko dut. New Order talde elektroniko eta popzalearen doinu guztiek txunditu ninduten Joy Division bukatu ondoren, 1981etik aurrera. Baina izen berarekin bada nazien gotorlekua den esaldia: “Mundu hobe bat eraikiz ariar belaunaldientzat”. Horixe da Adolf Hitlerrek idatzitakoa bere *Mein Kampf* liburuan, horixe da berarentzat New Order. Azkena, Prince. Prince Rogers Nelson, horiek dira izen-deiturak. Zertan pentsatuko dute guraso askok izena jartzerakoan euren umeei? Prince izena, eta denborarekin ezizen gehien duen artista izango da, hamabost inguru. Princek eta monarkia politikoek ez dute zerikusirik baina 1548an, hemezortzi zituela, Etienne de La Boetiek *Borondatezko morrontzaren diskurtsoa* edo *Norberaren aurka* liburua idatzi zuen. Zeharo galdera politikoa egin zuen, oraindik erantzun argia ez duena izan: zergatik guk, herri xumeok, egiten (ekoizten) dugu morrontza, zergatik borrokatzen dugu gure morrontza defendatzen (errege, estatu, jainko, botere, lege) gure askatasunaren alde egingo bagenu bezala?

D.A.F. bikoteak alemaniar erako elektropunka jorratzen du. Zuzena, erraza, sinplea bezain bortitza. Beti xaxatzen, musika eta politika, hitz garratz, maltzur, sexua nonahi. Robert Gôrl eta Gabi Delgado bikoteak technoa eta elektronika (musika mota honen lehen urratsak ematen ari ziren garaia zen, Kraftwerk...) punkaren jarrerarekin nahastu zuten modu bitxi eta minimalistan. Emaitza txundigarria geratu zitzaien. D.A.F. taldea utzi ondoren Chrislo Hass musikariak eratutako Liaisons Dangereuses taldea are zakarrago eta basatiago agertuko zaigu. Baina bi taldeetan baxuaren diseinuak eta erritmo kutxen egituraketak badute antzekotasunik. Gerora gogora ekarriko zizkidan Atari Teenage Riot eta Gose taldeak.

**RITXI AIZPURU.** AZKOITIA, 1959
Musika argitaratzailea
baga-biga.com

[ 32 ]

## **BACH. THE GOLDBERG VARIATIONS, BWV988**
GLENN GOULD



CBS Masterworks, 1982

Isiltasun beharrez gabiltza eta, aitzitik, zarata ekoitzi eta ekoitzi besterik ez dugu egiten. Ezin dugu saihestu harrokeriak barruan dugun mandeulia kanporatzea. Ezinezkoa zaigu isilik egotea eta entzutea. Eta hara nor datorren hona, hau idaztera. Ez dut barkamenik. Aitzakiarik bai, ordea: hamarkadetako erasoen aurkako erantzun neurritsua da hau.

Betiko lelo musikalen bilduma erraldoi baten aurrean gaudela, jada ez dugu babesik bilatzen eta gainean kaka egin diezaguten uzten dugu. Edozein kafetegitan. Edozein tabernatan. Edozein igogailu edo jaisgailutan. Edozein auto, autobus edo metrotan. Hegazkinean. Leku publiko eta leku pribatu guztietan.

Hortxe dago, uneoro, ekin eta ekin, garen merkantziak bihur gaitezen tematuta. Saiatzen naiz belarriak urruntzen berarengandik, baina alferrik. Musikazko uger geruza horrek jazartzen nau noranahi noala, buruan nuen hori suntsituz. 80etako Sestao hartako mantu gris eta nabarraren modukoa, zikin eta ikusezina, inguratzen gaituen irudizko larruazalaren modukoa.

Isiltasuna sortzeko moduetariko bat da zarata agertzen uztea, edo bideratzea, azaleratzen lagunduko duten soinuekin, antzeman dezagun. Isiltasun hori ezinezkoa da eguneroko fisikan, baina posible da erlazioen arte batean, une guztiek orainaldi bat osatzen baitute. Une ezohikoa eta aratza, hainbestetan birziklatuak izateagatik ahalmen ongarririk ez duten minda musikalen artean. Merkantzia horien guztien artean, beti ezkutatzen dira zenbait musika liluragarri eta antzu, berariaz edo ustekabean aurkituko ditugunak, edo aurkituko ez ditugunak.

Gure merkantzia musikala. Produktu edo zerbitzu ororen propagandazko estaldura zaindua. Jan ere ezin dugu egin bera gabe. Maitatu ere ezin dugu egin bera gabe. Hil ere ezin gara egin bera gabe. Ezin diogu ihes egin bere baimenari existitu ahal izateko. Ezin funtzio mentalik edo korporalik burutu bera gabe, bere ikuskapen eta onespenik gabe.

Teknologiarik aurreratuena eta ergelkeriarik aurreratuena konbinatuz, huskeriarik nabarmenenak lortu ahal izango ditugu, behingoz. Horrela, egunero sortzen dira astakeria musikal berriak, gure belarrietarantz narrasean datozenak, likitsu, beren arbasoen larruazal abandonatuen artetik.

Gure belarri errukarrietan onartzera eta egokitzera behartuta gaude. Batzuetan, gure zoritxarrerako, burmuineraino heltzen dira. Beharbada, gorputzerako beste sarbide egokiago batzuetan prozesatu beharko genituzke.

Identitatez –ortodoxoz edo eklektikoz– janzteko musikak dira, eta (kontsumo-) taldetxoak sortzeko, berehala osagarriak jariatuko dituztenak. Popa eta asaldura. Rocka eta asaldura. Adimen militarra. Klasikoen bidezko lasaigarriak. SMS bidezko doluminak. Egokitzea. Zurikeria. Menderatze musikala. Tortura.

Ezbairik gabe, musikazko mekanismo narkotikoak zehaztasun handia lortu du azken urteotan, segmentu *objektiboekiko* merkatu-sinbiosi handiagoz *posizionatutako* hamaika etiketa erabiliz. Hain zehaztuta dago, non Guantanamoetan erabiltzeko paketeak ere baitaude.

Disko bat aukeratzearren, 1982an CBS Masterworksek ekoitzitako eta merkaturatutako disko konpaktua proposatzen dut, erreferentzia CD37779 duena. Bertan Glen Gouldek pianoarekin interpretatzen ditu *Klabezinerako Goldberg Bariazioak (BWM 988)*, Johann Sebastian Bachek 1741ean idatzitakoak.

Disko komertziala da, hitzaren zentzu osoan: asko saldu zen, bere kategoria zein den aintzat hartuta. Oso erreferentzia entzunerraza da, mitomania eta bitxikeria puntu batekin (popak hala eskatzen du eta) eta oraindik erakargarria suerta dakioke sentsibilitate garaikideari.

Badirudi Bachek duen izaera konstruktibo eta gardena horretarako eginda dagoela. Ia musika elektronikoa bailitzan. Technoa da. Birtuala da. Patroiak iradokitzen ditu azpian dagoen etengabeko zerbaitetik. Gouldek izaera hori areagotu zuen, eta gainera aitzindaria izan zen teknologiaren eta estudioko lanaren ahalmena barneratzen eta aplikatzen diskogintzaren produktuetan, gerora musika popularrak masiboki erabiliko zuena. Aitzindaria izan zen, halaber, kontzertuak egiteari uzten, pop industrian originalenak eta errentagarrienak omen ziren interprete zenbaitek egingo zuten bezala. Horrekin batera, interesgarria da *interpretazio* kontzeptuaren elastikotasuna, musika-notazioaren erreprodukzio fisikotzat hartua. Ai, interpreteak, “beren burua goraipatzen duten horiek”, Ferlosiok zioen moduan popaz ziharduela. Uste dut abiapuntu egokia izan daitekeela berriagoak baina ez hain publizitatuak diren musika batzuk miatzeko.

Egia esan, aukeraketa honek ez du axola handirik. Axola duena da bestelako gauzak entzutea ahalbidetzen duten egoerak sortzea. Eta, ondorioz, testuinguruak sortzea musika entzuteko, eta ez soilik kontsumitzeko. Diskoa erreferentziatzat har dezake ezagutzen ez duenak, baina aitzakia hutsa baino ez da. Kafea eta galletak ekimenak gelditu eta entzuteko eskaintzen duen aukera aprobetxatzeko aitzakia. Gaur egun ekintza subertsiboa dena.

Saiakerak egiteko zenbait iradokizun:

· Monteverdi. *Vespro della Beata Vergine. 1610. Duo seraphim, a 3 voci*
· Xenakis. *Concret PH. 1958*
· Takemitsu. *Echo I*
· Russolo. *Risveglio di una citta. 1913*
· Prokofiev. *Sonata nº 7 - Precipitato 1939-1942*
· Henry. *Variations pour une porte et un soupir. Fièvre 2.* 1963
· Cage. *The Perilous Night: No. 2*
· Debussy. *La cathédrale engloutie.* 1910
· Barber. *Lingua Ludens.* 1994
· Bach:

  · *Das Wohltemperierte Klavier. BWV 846: Präludium Nr 1. C-Dur. 1720-1722*
  · *Matthäus Passion BWV 244, Part I: 27a. Aria eta korua II: So ist mein Jesus nun gefangen – Laßt ihn, haltet, bindet nicht! 27b. Korua I & II: Sind Blitze, sind Donner in Wolken verschwunden? 1727*
  · *Das Wohltemperierte Klavier. BWV 847: Präludium Nr 2. c-Moll. 1720-1722*
  · *Klavierübung: Aria mit verschiedenen Veränderungen (Goldberg-Variationen). BWV 988. Aria da capo 1741-1742*

· Ligeti:

  · *Poème Symphonique pour 100 metronomes. 1962*
  · *Continuum for clavicembalo. 1968*
  · *Réquiem. 1963–6*

· Händel. *Oratorio per la Resurrezione di Nostro Signor Gesù Cristo, HWV 47, Seconda parte: Aria: Ecco il sol ch'esce dal mare (S. Giovanni).* 1708
· Stockhausen. *Structure* 24

Edo Discépolo, jakina.

**RAMÓN BASANTA.** CEDEIRA, 1967
Musikazalea

[ 33 ]



## **SHOOT OUT THE LIGHTS**
## RICHARD & LINDA THOMPSON

Hannibal, 1982

Une gogoangarri ugari daude bikote honek, beren arteko harreman sentimental eta artistikoak iraun zuen bitartean, argitaratu zituen dozena erdi diskoetan. Halere, ez da arraroa bikotearen azken lana den hau guztietan onena dela uste duenik aurkitzea. Kantu ilun eta zorrotzak biltzen ditu, sentimendu fatalistaz josiak, haustura garratzaren isla direnak eta biolentzia uneak ere gordetzen dituztenak. Txarto gogoratzen ez badut, komertzialki arrakastatsuena izan zen.

Egia esan, ernaltzea eta erditzea zailak izan ziren. *Sunnyvista* diskoaren salmenta eskasengatik zigilurik gabe geratu ziren, eta Gerry Raffertyren laguntza onartu zuten –bere telonero izanak ziren–. Laguntza ekonomikoa, grabatzeko eta kontaktuak lortzeko laguntza, baita lan berria argitara emango zuen zigilu bat lortzeko ere. Gatazka horiek (1980ko udan gertatu zirenak) eta diskoa grabatu bitarteko bi urte horietan gauza ugari gertatu zen. Batetik, tentsio uneak Rafferty eta Thompsonen artean. Lehenengoak soinu konplexu eta landua lortu nahi zuen, bigarrenak bat-batekotasuna zeukan helburu. Proiektua bertan behera geratu zen, Joey Boyd ekoizle mitikoak Hannibal zigiluarekin sinatu zuen –bera arduratuko zen azken sesioez–, eta Raffertyrekin erregistratutako materialaren zati handi bat berriro grabatu zen, Simon Nicol gitarra-jotzailearekin, Dave Mattacks bateria-jotzailearekin eta Peter Zorn baxu-jotzailearekin. Bestetik, hirugarren semearen haurdunaldia eta erditzea. Eta hori gutxi balitz, iaia diskoaren argitalpenarekin bat eginez, harremanaren haustura; Thompson ordurako maitale batekin zegoen buru-belarri.

Boyden asmoa grabaketa bizkor eta merkea egitea zen, Estatu Batuetatik bira bat egiteko dirua gorde ahal izateko, baina ideia pikutara joan zen: bikoteak ezin zuen elkar ikusi. Kontratazio agentzien presioek eta, kontzertuak egin ezean, Ipar Amerikan izango zuten etorkizun artistikoaren inguruko mehatxuek errepidera eraman zituzten. Emaitza: kontzertuotan tentsioa labana batez moztu zitekeen. Simon Nicolen esanetan bazirudien Richardek Lindarentzako kantuak idazten eman zituela ezkondutako urteak, hautsi ondoren kantatzeko. Boydek kontatu zuen Providencen Lindak ostiko bat jo ziola Richardi hankazurrean, hau gitarra-solo bat jotzen ari zela. Beste batean, Buffaloko aireportuan, botila bat jaurti zion.

Hori guztia jakinda, *Walking on a Wire bezalako* kantuak entzutea zirraragarria da: *“Non dago justizia eta non dago zentzua oinaze osoa alanbre-hesiaren nire aldean dagoenean.”* Harremana hautsita dagoela... eta zure esku ezer ez dagoela islatzeko kantu erabatekoa. Baina zenbait kantu gehiago ere badira: *Don’t Renege on Our Love,* esaterako*, Was She Jumped or Was She Pushed?*

edo, *Walking on a Wire* bera, nire gogokoena, zehazki kantuaren amaiera, Richard bigarren ahotsarekin sartzen den unea. Islatzen duen zirrara hunkigarria da oraindik orain.

Disko gogor, idor, elektriko eta tentsio handikoa da, baina aldi berean lirismo ikaragarria du. Gutxik, oso gutxik, jarri dute disko hau laurogeiko hamarkadako onenen artean... eta, nire ustez, nekez konponduko den zentzugabekeria da. Gaur egun, biniloan zein CDan dago eskuragarri *Shoot Out the Lights*, 4 Men With Beards eta Rhino zigiluei esker. Rhinok Handmade sail goraipatuan –inportazioz lortzeko zail bezain garestia– berrargitaratu du luxuzko edizioan, argitaratu gabeko 11 kanturekin batera, zuzenean grabatuak diskoa editatu ondoko bira amerikar polemikoan. Disko funtsezko hori, kalitate eztabaidaezina duena, berreskuratu eta estimatuko ahal dute belaunaldi berriek! Agian gerizpean geratu baitzaie gure erruz, gauza hauek (besteak beste) gerta ez daitezen borrokatzeko eginbidea eduki beharko genukeenon axolagabekeriagatik.

**EDUARDO RANEDO.** BILBAO, 1968
Musika kazetaria

**[ 34 ]**

## VIOLENT FEMMES | VIOLENT FEMMES



Slash Records, 1983

Burutik jota zegoen emakume hura. Ezin ezer onik antzeman beragan, bere oihua besterik ez nuen entzuten kale ilun eta izoztu haren erdian.

Ederra egin zuen berriz, baina orduko hartan konponezina zen akatsa. Bat-batean, buelta erdia eman eta alde egin zuen. Une batez zalantza egin nuen, jarraitu beharko nukeenetz, baina nire koldarrak bertan lotu ninduen, geratu ohi ginen tabernaren aurrean. Gurutzatu eta bertara sartu nintzen; beroak tupustean hartu ninduen. Betiko tabernazulo horietako bat zen. Zabala, kristalak higatuta zituen, hormetako pintura berdea jada horixka, bezeroek tabako gehiegi erre izanagatik bertan, marmolezko barra garai eta luzea garagardoz blaitua zegoen. Argia ahula zen, Manhattan bat eskatu eta buelta erdia eman nuen. Argia gero eta ahulagoa zen, hondoan, hiru tipo agertu eszenatoki gainean ziren peto bakeroa jantzita, folk estilo hutsean, gitarrak eta gitarroi bat hartuta. Gordon, Brian eta Guy prest zeuden. Violent Femmes ziren.

Jendea hurbiltzen hasi zen eta nik jarraitu egin nien, inork ez zidan itxaroten eta horrek lagunduko zidan nire buru gaixotua entretenitzen.

Gordon hurbildu zen eta lehenengo kantua izango zena, *Blister in the Sun*, aurkeztu zigun, hasiera bikaina gitarroiarekin eta bateriarekin rockabilly estilo garbi-garbian. Berehala, estasi bitxi batek kutsatuta bezala, gero eta biziagoa zen musika harekin mugitzen hasi ginen, danbor handi baten barruan sartu izan bagintuzte bezala, bat-batean asfaltoaren gainerantz jaurti aurretik. Erlaxatzeko aukerarik eman gabe, gau hartan nuen aldartearekin bete-betean bat egiten zuen kantu batekin jarraitu zuten, *Please Do Not Go* erregutzen zuten ahotsek, logura balira bezala; hainbesterako zen non praketako sakelan bilatu nuen telefonoa bere zenbakia markatzeko asmoz, baina berriro ere, nire adore eskasak bulkada hori bertan behera uztera eraman ninduen.

Bere ganbara zaharrean diskoak jartzen zizkidan, eta ondorengo kantua bertan entzuna nuela iruditu zitzaidan: *Confessions*, presaka dabilen gizarteari egindako kritika lasaia, nirea bezalako gizarteari eta betebeharrei; kantuaren hitzak eta gitarra ahitu eta kexati haien musika nireganantz abiatu ziren lantza zorrotza bailiran.

Kopa hustu eta barrarantz egin nuen berriro. Zerbitzari zaharrak zakar begiratu zidan beste bat jartzeko eskatu nionean. Ahots biluzi bat hasi zen abesten, inolako akonpainamendurik gabe, eta jarraian erritmo itsaskor batek *Add It Up* izenez aurkeztu zuten abestian murgilarazi gintuen. Amaitutakoan, kontzertuak eragin zidan asaldura askatu ezinik kalera irten nintzen, korrika ateratzeko gogo izugarriz.

Biharamunean, ahoa hareaz beteta eta buruko min itzela nuela, soilik gogoratzen nituen lehenengo ordu haiek. Altxatu eta bere gauzak desagertu zirela ohartu nintzen. Bakarrik geratzen zen berak behinola ahantzi zuen zerbait: Violent Femmesen disko hura. Jogailuan jarri eta entzun egin nuen, hasi eta buka.

Porrot egin duen pertsona baten istorioaren zati bat da hau, erdipurdiko bizitza bat, non musikak, azkenean, ia dena sendatzen baitu.

**SILVIA BUENDÍA.** BILBO, 1975
Musikazalea

[ 35 ]

## CORAL INFANTIL CANTAIRES DEL CADÍ
CORAL INFANTIL CANTAIRES DEL CADÍ



Klamm Records, 1984

(2011-06-30, internet bidezko txat saio batetik ateratako elkarrizketa bat)

**18:34 ni:** aupa jota!

**Juan:** Kaixo, motel!.........
promo eta lan kontutan nabilek orain!

**ni:** zelan zihoak uda?
promotan? Alberto monteroren kontuarekin?

**Juan:** hainbestean
Bai, horixe.

**ni:** tira, animo.
Gogoan daukak disko hartaz eta liburuaz esan niana, ezta?
Kontaidak, ba

**18:43 Juan:** ok

**18:47** Ostiral batez, nire dendara etorri huen Vicente Burguera eta aipatu zidaan KLAMM RECORDS zigiluan, NEW BUILDINGS, T- DARK FIELDS eta KLAMM taldeen disketxea zen hartan, ia inork ezagutzen ez zuen beste erreferentzia bat zegoela...
hurrengo ostiralean hara agertu zitzaidan, urdin koloreko disko batekin, pegatinaz beteta, braillen idatzitako kartoiekin eta komiki batekin...

**18:48 ni:** eta nor da Burguera?

**18:51 Juan:** Jogailuan jarri eta utzi zidaan ea asmatzen nuen nortzuk zebiltzan horren atzetik eta handik hasi zituan agertzen zenbait izen, esaterako, marti brunet FUSSION taldekoa, Marceli Antunez (FURA DELS BAUS), Victor nubla (macromassa eta hamaika kontu gehiagotan ibilitakoa) Gat castaño eta Aibo, azken 2ak NEW BUILDINGSekoak.
Vicente Burguera europako number 1a duk, laguna diat eta gehiegi zakik.

**18:52** Pokorarekin kolaboratzen dik alde esperimentalenean, bere vinyltribeseko orria bidali nian, hainbat bitxikeria deskubritu ditik, 60etako gauza iluneta-tik abangoardiaraino, galaktiko hutsa.

**ni:** ok

**18:53** bildumagilea, beraz...
edo deskubritzailea...

**18:56 Juan:** lehenengo ikertzailea, gero collector, morroi horrek dirutza

gastatu dik diskoak erosiz, auskalo zelako diskoak, eta ondoren 100etik bat ateratzen dik, horregatik heltzen duk lehenengoa beti http://www.vinyltribes.com/tribes.html?dir=desc&order=price

**18:57 ni:** jakina

**Juan:** HANS POKORAren liburuak gomendatzen dizkiat, 6 ale dituk, uste diat, eta azkena, hein handi batean Vicentek berak egin zian, ildoa aldatu duk orain kontu esperimental gehiago agertzen dituk acid rock, progresibo, folk, hard rock edota garagearekin batera.

**18:59** diskoaren datari begiratu, eta 1983 ikusi nuenean, entzun gabe galdetu nioan lagunari zenbatean zegoen, trade edo cashean, eta duela 5 urteko 200 euro eskatu zizkidaan.

**ni:** halako gauzak entzuten hituen orduan?

**19:00 Juan:** askoz lehenagotik ere, nahiz eta jendeak uste duen hippya naizela

**19:03 Juan:** baina gauza industrialagoak ESPLENDOR GEOMETRICO, COMANDO BRUNO, RESIDENTS, THROBBING GRISTLE eta gauza ilunagoak, ez hain esperimentalak. Musica Dispersa

**ni:** itzelak

**Juan:** Naif- Atlas

**19:04** baina, tira, gaztetan EDAD DE ORO osoa irentsi nian, zoritxarrez... VAGINA DENTATA eta bere txakurrak... nik jakin ez halakorik existitzen zenik, JIMI, IRON MAIDEN, NEGATIVOS, AC/DC, JUDAS PRIEST, RAMONES, KING CRIMSON eta halakoak entzuten nitian, gehienbat.

**19:05** Diskoa nik nituen zenbaitekin trukatu nioan, PERUCHOS eta WELCOME TO AMORIÑOS, zenbait kopia bakoitzeko...

**19:07** artefaktoa poltsan nuela etxerantz egin nian entzuteko asmoz, gabonak zituan, gure ama eta iloba etxean zeudean, ozen-ozenki jarri nian eta umetxoak ezin zioan barreari eutsi, berarentzat normala huen, baina amak zioan desafinatzen eta ezin txarrago abesten zutela............

**ni:** jajaja

**19:08** eta hi pozez zoratzen

**19:09** jira eta bira, ezta?

**Juan:** hori baino gehiago.........
bildumazale gisa, berehala ekin nioan kopia gehiago bilatzeari

**19:10** Ezingo niake sentsazioa ondo deskribatu, ematen zian RESIDENTS taldea GRACIA auzoan egon izan zirela, absentak edaten, eta ondoren estudio batean giltzaperatu zirela umeekin batera.

**19:12** bildumazale gisa pentsatu nian sekula ez nuela halako gauza bizarrorik entzun, eta inork ez ziok baliorik kenduko lan horri, mainstream instituzionalak erdipurdiko hamaika gauza santifikatu ta gero. Garai hartan disko hau ez ziaten nahi bertan kantatzen duten umeen gurasoek ere, tira, kantatu baino desafinatzen dute a ttuttiplain...

**19:13** http://www.vinyltribes.com/catalogsearch/result/?q=coral+infantil&x=0 &y=0

**19:19 ni:** eta kontzerturik ere ez ziaten emango, ezta?

**19:20** (nahiz eta hik ez ikusi, jakina)
zerbait al dakik haietaz
inork ikusi al zitian?

**19:26 Juan:** disko hau baino lehen baliteke, umerik gabe, artefakto hau kasetean fabrikatu zen lehenago, umeen ahotsik gabe, LMD zigiluan: "laboratorio de música desconocida".

**19:32 Juan:** MUSICA POR CORTESIA zian izena

**ni:** eta zenbat kopia zeudean?
zenbat dituk hik?

**19:40 Juan:** 300 bat prentsatu omen zituan... eta bat edo beste zeukeat nik.

**ni:** eta hire hirian mugimendurik al zegoan
ala heu hintzen berezi bakarra
hire denda...

**Juan:** nik hobeto nikean kafea eta galletakeko saioetan egon izana diskoaz hitz egiten... bide ugari sortzen dituk, eta bildumazale bat agertu bitartean, diskoa egin zutenek ere ez ziotek garrantzirik ematen, areago, txatarra balitz bezala begi-bistatik kentzen ditek (ez beti), baina Espainia binilo-hilerriz beteta zegok, esaterako LA METRALLETA, CHACHACHA, hire auzoko denda hura, eraman ninduana, edo RAFA GALLUPen ganbarako biltegia, hara eramaten baitituzte artistek eta zigiluek gainetik kendu nahi dituzten biniloak, eta ikusten dutenean zerbait mugitzen hasten dela beren lanarekiko edo diruarekiko interesa pizten zaiek berriro...

**19:42 ni:** betikoa

**19:43 Juan:** industrialaz kontrolatzen duen bat edo beste bazegok, esaterako dendara etortzen huen bat, Manolo o Ruben Garcia izenekoa, Audiopollution, baina disko honetaz fitxik ere ez, ezta beste elementu batek ere, musika oneko 40.000 bat disko dituena... iberikoa, euskalduna, katalana... dena zeukaan, baina hau ez, eta oparitu egin nioan bat.

**19:44** Folk pastoraleko uneak zauzkak, umeek desafinabestuak, kanturik martzianoek MUSICA DISPERSAko Manuel Brabo "el CACHASek egiten zituen kantuak zakarzkidak gogora

**19:45 ni:** nik bi mp3tan zeuzkeat, hemen lortuak:
http://stahlfabrik.blogspot.com/2009/01/coral-infantil-cantaires-del-cadi.html

baina, berez, abesti asko dituk, ezta?

**19:46** ala jatorrizkoan 2 korte bezala agertzen dituk?

**Juan:** Diskotik erakartzen nauena objektua bera duk, gaina bazeukak balio artistikoa, ez dakik non jarri, abangoardian, boutaden, nahita egindakoen artean... ala adar-jotze huts bat den, artearen historian ikusi ditugun guztien arteko beste bat, Dali, Joseph Beuys, Emilio el moro, Macromassa, Residents, Warhol, Calatrava anaiak, Bibi Andersen, Divine bezalakoak

**19:47 ni:** eta objektua nolakoa da?
argazkia besterik ez diat ikusi ta:

**Juan:** korteak banatuta agertzen dituk...

**ni:** binilo urdina, ezta?
(guztiak zituan urdinak?)
tartekirik?

**19:52 Juan:** Poltsa garden bat duk, eta barruan disko urdina, hamaika pegatina eta liburuxka bat, abestien azalpenekin eta marrazkiekin, Viborako marrazkilari batenak (MAX, uste diat) eta ume batzuenak... oharrak zeudek liburuxkan, diskoa egiteko dirulaguntza nola gorroneatu zen, eta kolaboratzaile eskuzabalen zerrenda, uste diat CAIXA CATALUNYA hortik zegoela...

**ni**: jajajaja
lehen askozaz zailagoa izango huen horrelakoetara heltzea
nola moldatzen hintzen internet baino lehen?

**19:57** nolakoa huen diskoen trukaketa?

**20:04 Juan:** denda izan aurretik ere katalogo bidez saltzen nian, zerrendak egiten nitian eta nire kontaktuei bidaltzen nizkiean, Valentzian egon zitezkeen leku garbi edota hautsez betetako guztietatik pasa nintzen, azoketatik hasita etxe partikularretara, Rafael Gallupen denda bezalako azpimunduak barne, bilbon erakutsi hidana baino *antroago* zena... eta horrela hiriz hiri. Ondoren, premiagatik, denda muntatu nian, jan ahal izateko, 10 bat urte iraun nitian, oso gogorra baita hainbeste freak jasatea Valentzia erdian, gainera alokairuaren prezioa garestitu zidatean eta dendako sabaia erori egin huen. Erabaki nian ordutik aurrera Valentziatik kanpoko biltegi batetik lan egitea, bakarrik internetetik eta etxetik bezero adiskideekin.

**20:05 ni:** aha
ba, primeran.

**20:07 Juan:** Bai, orain alde egin behar diat, besarkada

**JUAN PEDRO PARRAS.** PUERTO DE SAGUNTO (VALENTZIA), 1965
Greyhead zigiluko ekoizlea eta disko saltzailea
greyheadrecords.com

**[ 36 ]**

## **RANT N´ RAVE WITH THE STRAY CATS** | STRAY CATS



EMI, 1983

**MUSIKA NIRE MODURA**

Esaten dute Pat Boone abeslari estatubatuarrak Frantzian izandako opor egun batzuetan idatzi zuela hain ezaguna zaigun *My Way* abestia. Garaiko abeslari frantziar ospetsu bat entzun omen zuen irratian eta, frantsesez ez zekienez, melodiak eta ahotsak iradoki ziotenarekin letra berria sortu zuen. Frantziar abeslariaren izena ez dugu gogoratzen, ezta bere abestiaren mezua, hainbat eta hainbat autore eta obren moduan hantxe geratu ziren, Frantziako goiz eguzkitsu baten soinu banda, denboraren poderioz beilegi geratu den postalaren antzera. Baina *My Way* abesti berria bai ezagutu eta gogoratzen dugula, Frank Sinatraren ahotsean. Benetan, abesti mundiala, batez ere letrak dioenagatik: *"bizitza plenoa bizi izan dut, autopista guzti eta bakoitza bidaiatu ditut, eta gehiago, hau baino garrantzitsuago, nire modura egin izan dut"*.

Badirudi mila urte pasa direla niretzat berria zen Stray Cats izeneko talde baten kasetea denda batean aurkitu nuenetik. Bai, kaseteak oraindik erabiltzen ziren eta urte askotarako. *Rant n´ Rave* zuen izena eta hiru gazte argalek begiratzen zidaten portadatik, kotxe berezi bat lapurtzen saiatzen ziren bitartean. Beharbada lapurretan harrapatu izan nituelako edo berdin zitzaielako begiratzen zuten horrela. Urte batzuk geroago kotxea *hot rod* bat omen zela ikasi nuen. Dena den, kasetea etxera eraman eta hantxe Pat Booneri frantziar abeslariaren abestiarekin gertatu zitzaiona gertatu zitzaidan neuri ere. Beste mundu batean sartu nintzen, ezagutzeko irrikan nengoen mundu argitsu eta gazte batean. Hizkun-tza ez nekienez, nik hemendik eta handik hartutakoarekin sortzen bukatu nuena.

Cadillac batean sartu *(Look at That Cadillac)* eta Memphisera joan nintzen *(18 Miles to Memphis)*. Han nik neuk izan nahi nuen hamazazpi urteko emakume sexya bizi zen *(Sexy and 17)*. Norbait berarekin maitemindu eta teilatuetatik abesten zion, katuek gauari abesten dioten moduan *(I Won´t Stand in Your Way)*. Baina guztia ez zen gozo eta xamurra. Bizitza gogorra ere bazen, irratian ezin zen rock'n'rollik aurkitu *(Something´s Wrong With My Radio)* eta errebeldeen antzera neure jokabide eta arau propioak izan behar nituen *(Rebels Rule)*. Beharbada portadakoen antzera *hot rod* bat lapurtu eta talde batean sartzea izango litzateke ideiarik onena *(Hotrod Gang)*, baina zenbat denbora bizi nahi nuen horrela? *(How Long You Wanna Live, Anyway?)* Beharbada, James Dean aktorearen antzera, urte gutxi hilotz ederra uzteko. Han aurkituko nituen jokabide bereziko pertsonaia interesgarriak *(Dig Dirty Doogy)* eta haiekin bidaiatuko nuke *(Too Hip, Gotta Go)*, bizitza bidaia besterik ez baita.

Egia esan, berdin zen zer esaten zuten hiru katu horiek. Beraiek sortutako melodiak eta ulertzen nituen hitz gutxi batzuek neure mundua sortu zuten. Ziur aski jada neure barnean nuen mundua, baina artean konturatu gabe.

Han beti zen uda eta bidaia zen helmuga. Bideko hautsa eta sexu nerabea elkartzen ziren etorkizun hitza existitzen ez zen mundu dardarkari batean. Eta etorkizunik ez dagoenean, beldurrik ere ez dago. Guztia da akzioa eta orainaldia. Horrela gogoratzen dut musikak sentiarazten zidana. Eta horrela sentitzen dut, berriro entzuten dudanean, orain CD formatuan, nire ingelesak eta beste ezagupen batzuek ezinezko mundua dela garrasika esan arren. Musika zahar hori jarri eta berriro naiz errepidean, nire mundua, nire modura sortzen.

Denborarekin *Rant N´ Rave with the Stray Cats* talde estatubatuar baten hirugarren diskoa zela ikasi nuen, 1983. urtean argitaratutakoa. Brian Setzer, Lee Rocker eta Slim Jim Phantom ziren portadatik begiratzen zuten gazte argal horiek eta 50eko hamarkadako musika rockabillyan oinarritutako musika berria egiten zutela ere ikasi nuen. *Neorockabilly*-a batzuen esanetan. Eta beste hainbat gauza ikasi nuen talde eta musika honi buruz, baina ez nuen sentitutakoa ahazten ikasi. Horixe da musikaren botere izugarria. Eskerrak.

**NAGORE ABURRUZAGA.** BALMASEDA, 1976
Musikazalea

## [ 37 ]



## **SWORDFISHTROMBONES** | TOM WAITS

Island, 1983

**TRONBOIEZPATARRAINA**

*TON WAITS. Azkoitiko MATADEIXEN. 2008 uztailak 12. 20:00. Patata ta ketxupa. Garia ta Maria. Sagardoa ta txalaparta. Sarrera 1´08 euro. Bukatu artean prezio herrikoiak. Egitaraua Tonen gogoen arabera abiatuko da. Berandu etor zaitezke. Azkenak, eman SU.*

Kontatuko dizudan istorio hau Azkoitiko Matadeixen hasten da. Liburu honetan parte hartzea eskatu didan pertsona bertan ezagutu bainuen. Ez da erraza disko bat aukeratzea, baina kasu honetan, aitzakia perfektua daukat.

Madrilen bizi nintzen garaian, ohitura nuen Alphaville eta Renoir zinema geletara joateko (filmak jatorrizko bertsioan ikus eta entzutea maite nuen). Bertan entzun nuen lehenengo aldiz Tom Waits. Jim Jarmushen *Night on Earth* pelikula ikusten, hain zuzen. Bere ahots zakar eta doinu malenkoniatsuek harrapatu egin ninduten. Hortik aurrera hasi nintzen Tom Waitsen musika eta lana deskubritzen.

Madrilgo garaia pasa eta Bilbon kokatu nuen nire egoitza berria. Garai hartan, *Bilbo post-industrialak* zer esanak eta zer eginak transmititzen zizkidan. Nola ez, San Frantzisko auzoan alokatu nuen etxebizitza. Eta garai hartan sortu ge-




nuen Mina Espazioa. Guggenheim museoa inauguratzen zen egun berberean zabaldu genituen Mina Espazioko ateak. Bertan, Antzerkiola Imaginarioaren *8 Olivetti poetiko* lana plazaratzen genuen bitartean, *Anderground* deitu nuen trilogia osatu nuen.

> “(…) Aitortu behar dut ordea, ‘8 Olivetti Poetiko’ lanak ikusmin guztiak asetzen dituela. Tom Waitsen errenkarnazio bizkaitarra den Ander Lipus kandelargiarekin eguneroko bizitzak isuritako labezomorroen bila dabilen arren, zortzi olivetti poetiko hauek ez dira sekretaria lotsatiek gutun erromantikoak idazteko erabiltzen dituzten horietakoak. (…)”
>
> *Kultur kronika*, Harkaitz Cano

Esaera batetik jaio zen proiektua: “Egiarik handienak undergroundean ezkutaturik daude”. Hala, hiru pertsonaiatan gauzatzen zen: mozkorra, umea, eta eroa, egia handi horien esatariak, alegia. Lau idazle garaikideen testuez baliatzen ziren bakarrizketa antzezlanak: Josu Lartategi (*Ardoaz*), Sara Saghi (*Minutu bakarra*), eta azkena Peru C. Saban eta Pedro Blanco (*Mis rarezas dirías tú*). Hiru bakarrizketa hauek osatzen zuten *Andergrounden Trilogia*. Eta, hiru bakarrizketak, Tom Waitsen *Swordfishtrombones* diskoko *Underground* abestiarekin hasten ziren. Bakarrizketak nahiko krudelak ziren eta pertsonaia nahiko marjinalak antzezten nituen.

> *“Zaborrean bizi gara, ados, konpaiok, baina zabor artean harribitxiak ere egon daitezke: putetan ibiltzea, kasu. Nik ez daukat lagunik, baina eukiz gero, seguru hortxe hasiko zirela moralkietan. Jendea ez da konturatzen gizon ugarirentzat helduke*

*bakarrenetarikoa dela. Kaguen dioro! Bakarrik bagaude eta gainera itsusiak bagara zergatik ez dugu hiru mila edo bost mila pezeta ordainduko puta bategatik? Txortan egiteagatik? Amodioa telebistako asmakizun dugu batzuok, maitetxo polit bat ondoan izan dezakegula pentsatzea fartsa penagarri baten partaide garela aitortzea da.*

*Zoazte guztiok akerraren ipurdia miazkatzera, jode, hipokrita halakook, eta utz gaitzazue bakean. Gu bakardade mingarrian bizi garen gizon-emakumeak baikara, itsusiak gara, higuingarriak jende goapoaren begietarako, gehiengoaren iritzi garbietarako.*

*Orain, adibidez, ederto batean nabil puta brasildar honekin. Txupaka egiten dit gogor txorta-txortatik. Maite-hitzak xuxurlatzen dizkit belarrira talegoak behin jasotakoan. Eta bere barruan korritzen naizenean haren maitetxoa naizela botako dit, sekula ez duela horrenbeste goxatu, eta niri bost bezero guztiei gauza bera esaten badie, nik dakidan gauza bakarra hau da, itsusia izanagatik ederra naizela esango didala, ene baitako esne miragarria edango duela poza antzean eta nik haren belarrien atzealdeari musu egingo diodala. Maite haunat, esango diot euskaraz, berak piperrik aditu ez arren, segi zan horrela, xurga nazan dena, amante, politte, laztana... eta gero talegoak emango dizkiot eta Erandioko nire ostatura joango naiz, eta ohe hotzera sartuko putaren perfume merkearen usaina soinean. Eta ametsetan hasiko naiz txikitako ametsekin, txikitako txakurtxoa imaginatuko dut, eta akordatuko naiz haren jolaseko grinaz eta behin izan nintzen ume koxkor harekin ere akordatuko naiz, iñuxentea.*

*Rubyrekin ere akordatuko naiz. Rubyrekin ere bai. Ruby...*

*Ardoaz*, Josu Lartategi

Denbora joan ahala, Waitsen disko guztiak erosi edota entzunak nituen. Hainbat filmetan parte hartzen zuen, baita aktore gisa ere, eta Bob Wilson antzerki-zuzendariarekin ere lana egin zuen, beste hainbat proiekturen artean.

Azkenean, Euskal Herrira zetorrela eta pozik hartu nuen berria. Donostiako Kursaalen jo behar zuela eta bizkor joan nintzen sarrera hartzeko ideiarekin. To! Prezioa ikusi nuenean, ez zidan batere graziarik egin. Ehun eta pikuko sarrera ordaindu? Ezta pentsatu ere! Mitoa erori zen.

*Ez dago egiarik, eta, izatekotan, orainaldian eta gerundioan jokatutako aditzetan gordeta dagoena da. Gainerako guztia zentzu bako asmazio luminoteknikoa baino ez da. Egia kontrastatuak: kontsentsu hori ez da batere sentsuala. Barruan fruiturik ez duten oskolak, edo hiltzea txarra da eta pum! Galde diezaiotela ehiztariaren miran den txoriari. Horrelakoak dira gure egiak: negoziazio doilorren bidez iritsitako itunak; gainera, gehien-gehienok ez genuen negoziazio horietan parte hartzeko gonbitik jaso. Irabazteko aukerarik ez dutela jakin gura gabe jokoan dihardute gizabanako gehienek. Begiak estalita, Justizia bera bezalaxe. Egoitza finkorik gabe, Justizia bera bezalaxe. Esku batekin trukatutako balantza bat eusten, Justizia bera bezalaxe, beste eskuan inoren odolez zikindutako ezpata zahar bat daukatela, Justizia bera bezalaxe, Justizia bera bezalaxe. Zenbat argi-txakur izenik gabeko soldaduengatik, eta azkenean zer eta ez diegula deus ere zor, ez direlako gure gerrak izan, ez direlako gure iraultzak izan. Oso-oso duina iruditzen zaigu, bai, baina nire minutua neurea da, eta ez museo*

*batean gordetako baionetarena, eta ezta ezein izar gorrirena, are gutxiago edozein bake-planena. Eta zera esango dizute: bai lagun, baina badakizu, horrelakoa da politika... Politika. Politika rol-joko handia baino ez da, denik eta handiena, denik eta drakoniarrena, denik eta izugarriena. Guk sinetsi egiten dugu, minutuaren nerabeak garen heinean. Inor hil behar dugula esaten badigute, ba, pum!, eta hori eginda gaizto izateari uzten diogu. Inor kolpekatu behar dugula badioskute, ba, danba!, joka hasten gara. Eta isildu beharra badago, ba... Zein itsu gauden, erromes sedentarioak. Historia ofiziala sinetsi dugu, letra larriz idatzitako hori, bestea (historia sekretua, letra xehez idatzitakoa) bilatzen saiatu beharrean. Duintasuna une oro berrasmatuz duin egoten jakin izan zuten txorien gisako izaki magikoen historia. Momentu bakoitza duinki berrasmatzen: alkimia erotikoa. Ez dago zertan punk, dadaista edota Cheren kolore gorridun fotokopia izan: bakoitzak istorio bat, bere istorioa berrasma dezala, eta izan dadila goizero eguzkia esnarazteko gai (ilargiaz ahaztu gabe, hori bai). Izan gaitezen likido, ilargi urrun, poesia, iruzur eta amarrurik gabeko espresio huts, izan gaitezen gerundio zirkular, instanteen artista. Momentu ezti zein mingotsak gure izan daitezela. Zureak, nireak: edonorenak eta denonak. Baina geureak izan daitezela. Ez bitza inork asma geure miseriak, ez bitza inork idatz gure pozak. Ahantz gaitzatela.*

*Minutu bakarra*, Sarah Saghi

Bat-batean, Azkoitiko Matadeixetik deitu zidaten. Ia prest egongo nintzen Ton Waitsen kontzertu *alternatibo* bat egiteko. Pentsatu gabe, baiezkoa eman nuen. Waits Kursaalen jotzen zegoen bitartean, etxean egon baino hobe nuen, bera izan eta bertan izan.

Jakina, ez zen jende askorik agertu. Baina, lagun artean partekatu genuen Kursaaleko kontzertuan egon ez izana. Bere kanta batzuk kantatu nituen, piano erraldoi bat, *ketchupa* eta *whiskya* lagun nituelarik.

*Estoy colgado sobre el sonido inminente de tu mano acercándose a los labios para decirme...*

*Bala bat pistolatik atera eta bidaia bat hasten duenean helburua du helburu, hori da garrantzia daukan bakarra. Balaren norabide zuzen horretan ez dago bidaiarik, ez dago paisaiarik inguruan, ez dago denborarik tarte horretan ezertan pentsatzeko, ezta goxatzeko ere. Lekualdatze subitum bat baino ez da balaren bidaia. Balaren etorkizuna, balaren oraina bera da, hain da azkarra dena.*

*Estoy colgado sobre el sonido inminente de tu mano acercándose a los labios para decirme...*

*Nitaz salba nazazue.*
*Hasi bezain laster bukaeraren bila ibili naiz bizitza deitzen diogun bidaia honetan. Bidaiaren bukaera gorputzaren heriotza eta arimaren usteltzea izateak ere ez nau atzera bota. Etorkizuna bihurtu izan dut nire orainaren funts. Hiritarra izatea izan da beti ere nire gogoa. Sutondoa. Telebista elkarrekin ikusten duen familia zoriontsu bat eraiki.*

*- Juan Nadie!*
*- Presente!*

*Horixe bakar-bakarrik. Hain handinahia ez nintzen ba!*
*Eta nire lekutxoa bilatu dut gizarte deitzen dugun horretan, nonbaiten nire izen-abizena, edo nire zenbakia, daraman eserlekuren bat aurkituko nuelakoan. Niretzat esklusiboki gordetako lekua. Laukitxo bat lurrean. Beste guztiek ni hiltzen naizen orduan nonbaiten eserleku hautsi bat aurkitzea, edo espaloiko losa bat altxatuta. Norbaitentzat behintzat garrantzitsu sentitu.*

*Estoy colgado sobre el sonido inminente de tu mano acercándose a los labios para decirme*

*Munduan leku bat aurkitu nahi izanez gero lana bilatu behar nuela irakatsi zidaten berehala. Hau kalamidadea! Aintzina esklabuek egiten zuten lana. Orain, berriz, hiritar zintzoa izateko lan egin behar! Zer aldatu ote dugu!*

*Hala, neure buruaren jabe izan bezain laster sutsuki hasi nintzen ikasten. Bi karrera egin nituen aldi berean: etorkizuna zalantza izpirik gabe bermatzen duten horietakoak. Eta nota onak atera nituen bietan, lana aurkitzeko lasterketan. Ingelesa, alemana eta euskera ikasi nituen ere. Baina lan espektatibak aldatu egin ziren karrerako urteetan, eta ikasketak amaitzean etorri zitzaidan lehen aldiz hutsune itogarri hura lepotik gora.*

*Fogeozko bala ote nintzen?*

*Mis rarezas dirías tú*, Peru C. Sabán & Pedro Blanco

Horrez gero, mitoa sutara bota nuen baina Tom gustura entzuten jarraitzen dut. Bere abestiek badute xarma berezi bat. Ukaezina. Hala ere, egun, Kubara asko bidaiatzen dut, eta hango jendeak hala esaten dit. *"¡Asere! Eres igualito a Elton John. ¡Ya tu sabes!"*. Zer egingo diogu ba!!

Tomek *Swordfishtrombones* abestian esango lukeen bezala: *"And if you think that you can tell a bigger tale, I swear to God you´d have to tell a lie"*.

**ANDER LIPUS.** MARKINA-XEMEIN, 1971
Aktorea
artedrama.com

[ 38 ]

## **ΜΑΣΚΕΣ ΗΛΙΟΥ** | ΛΕΝΑ ΠΛΑΤΩΝΟΣ *



Lyra, 1984

Duela gutxi disko hau aipatu genuen gure lagun Euripidis Sabatisen liburuan. Hain zuzen ere, testu hau beste haren jarraipena da. Asko entzuten dugun disko bati buruz ez dakigunaz hitz egingo dugu. Guretzat, *Londres-Atenas* deitzen dugun marrazki, testu, argazki, bideo eta oroitzapen multzoarekin du zerikusia. *Londres-Atenas* gatazka baten izena izan daiteke, bi punturen arteko distantziarena, edo toki batean egon eta beste baten gainean pentsatzeko modu batena.

Diskoa Atenasen ezagutu genuen, 2004an. Londresera eta Atenasera bidaiatu genuen hirien arteko bidaia, eragin, truke eta arpilatzeen zenbait ardatzek nola funtzionatzen duten aztertzera. Partenoiko marmolekin zer gertatzen zen ikusi nahi genuen, Londres eta Atenasen artean banatuta baitzeuden. Hiri bietan aurkitu genituen lagun onak musikari esker. Atenasen, Aristomenisek Lenaren aurreneko diskoak grabatu zizkigun, eta zirrara handia eragin ziguten. Berak kontatu zigun Lenak, kanta batean, kalean aurkitutako eskolako koaderno bat irakurtzen duela. Koadernoa Hesperia Iris Greca deitzen den neska batena da. Horrela deitzen da kanta, Σπέρια Ίρις Γκρέκα *(Hesperia Iris Greca)*, baina beste disko batean dago, Λεπιδόπτερα *(Lepidoptera),* (Lyra, 1986).

Lenak dio *Maskes Iliou* diskoan Cholargosen eta Papagoun egindako paseoez hitz egiten dela. Beste batzuek diote Lenak bere egunkari pertsonalez, emigratzaileez, haurtzaroaz, merkataritza-guneen botereaz eta gure bizitzetan ordenagailuek duten eraginaz hitz egiten duela kantetan.

Alexandriari buruzko beste disko bat idatzi zuen, inoiz han izan gabe. “Nire ametsean soilik ikusi dut. Zerbait sinestezina ikusi nuen: koloreak, urrezko eguzkia, ilunabar bat Alexandriako portuan”. 2010eko udan Alexandriara joan ahal izan ginen Londresi eta Atenasi buruz marraztera, eta astebetez egunero ikusten genuen ilunabarra portuan. Orain marrazki horietan ikusten dugu nola egiten duten bat egunkari pertsonalek, paisaiak eta politikak.

Lenak pianoa ikasi zuen Atenasen, bere aitarekin, eta irrati arabiarra entzuten zuen. Gero Vienan eta Berlinen jarraitu zuen ikasten. Bidean, jazzera, rockera eta ekialdeko musikak deitzen duen horretara hurbildu zen. “Ekialde nahikoa izan behar da”, dio. Yamaha C 100 bat erosi zuen, bizikletan pasatzen zenean merkataritzaguneetatik zetorren soinua entzun zuen, eta bere etxeko hozkailuarena.

Platonosen musikaren deskribapen bat grekotik euskarara automatikoki itzultzen badugu, hauxe dio:

> *“Plato de diskoak jarraitu ikerketa bide horren bidez klasikoak bertsoz-koruak formularioa saltoak, diskurtsoa, hau da, melodia bat bezala tratatzen da, eta ahotsa*

*sartzen elektronikoan interferentzia minimalismoan aldera bide luzea baten gainean zentratu da"*

*Maskes Iliou* haren hirugarren diskoa da eta gure gogokoenetako bat. 2004tik oraindik ezin izan dugu jakin zer kantatzen den, edo esaten den, bere kantetan. Diskoaren izenburuak "eguzkitarako betaurrekoak" esan nahi duela uste dugu.

**JELETON**
**Mª ÁNGELES ALCÁNTARA-SÁNCHEZ.** MURTZIA, 1975
**JESÚS ARPAL-MOYA.** BARAKALDO, 1972
Diseinatzaileak
jeleton.com

* Maskes Illiou, Lena Platonos

**[ 39 ]**



## **OCEAN RAIN** | ECHO & THE BUNNYMEN

Korova, 1984

Esan ohi da arte guztiak hiru alditatik igarotzen direla: lehenik eta behin fase *primitibo* edo *gazte* batetik, gero fase *klasiko* batetik, eta, azkenean, *barrokotik*; ondoren, pentsatzekoa da, arte jakin horren heriotza dator, eta –kasurik baikorrenean– zerbait berria sortzen da dena delakoaren errautsetatik. Artisten garapenari, maiz, eskema berdina ezartzen zaio, eta, batzuetan, asmatu eta guzti egiten dute halakoak botatzera ausartzen diren adituek zein amateurrek.

Bilakabide hipotetiko horrek funtzionatuko balu, *Ocean Rain* Echo & the Bunnymen talde liverpooldarraren disko barrokoa litzateke, *Crocodiles* (1980) eta *Heaven Up Here* (1981) primitiboen eta *Porcupine* (1983) klasikoaren ostean –taldearen izen bitxiaren esanahiaren inguruan, "Oihartzuna eta Untxitxogizonak", bertsio kontrajarriak daude, ziurrenik taldekideek berek zabalduak, eta, ondorioz, ez naiz gai horretan sartuko; zaila da jakitea, edonola ere, arrakastaren zenbatekoa zor dieten talde batzuek beren buruak bataiatzeko aukeratutako izenaren tasunei–. *Afterpunk* deituriko uholde sonikoaren baitan hazitako taldea dugu Echo & the Bunnymen, hau da, The Teardrop Explodes, Magazine, Joy Division, The Sound, The Psychedelic Furs eta enparauen –antzeko– larreetan bazkatutakoa. Besteak bezala, angustia postnerabez betetako kanta ertzetsuak idazten hasi ziren, eta izentxoa lortu zuten haien lehenengo LPen bitartez –kultuzko banden ligan betiere–. Baina hasierako soinu urduria *Porcupine* argitsuagoan leundu ondoren, urrats bat haratago emateko premia sentitu zuen laukoteak.

Echo & the Bunnymen talde anbiziotsua, harroa eta handinahia zen, derrigorrezkoa dena, ziurrenik, The Beatlesen jaioterrian bertan pop musika egiten ausartu ezkero. Abesti berriak, ordura arte ez bezala, sokazko orkestra-moldaketez eta muturreko erromantizismoz hornitzea erabaki zuten taldekideek, eta, kontua errematatzeko, nora eta Parisera abiatu ziren diskoa grabatzera, ingeles batzuengan, onar dezagun, pinpirintasunaren mukurutzat baino ezin dena kontsideratu. Hots: jokaldia oso gaizki atera zekiekeen; modu horretan sortutako zenbat diskok ez ote duten erreka jo musikaren negozio garaikidean…

Untxitxogizonei, ordea, ondo atera zitzaien: bederatzi abesti distiratsu bildu zituzten, eta, mirakuluz, orkestra-moldaketek arazorik gabe egin zuten bat doinu oro har akustikoekin –ordura arte banda elektrikoagoa zen, baina disko honetan nabaria da eskuilen erabilera baterian, eta Washburn gitarra akustikoen presentzia–. Hainbeste ezen, kanta hauek zuzenean entzuten direnean, bandaren ohiko tresneriarekin eta orkestraren laguntzarik gabe, zer edo zer falta zaiela nabaritzen baita. Eta oso disko gutxiz esan daiteke halakorik, poparen historian: niri, honekin batera, Love taldearen *Forever Changes* baino ez datorkit burura –eta ausartuko nintzateke esatera baduela azken horrekin zorren bat *Ocean Rain-ek*: taldeak ondo ezagutzen zuen Maitasunaren Udaren inguruan Mendebaldeko Kostan egin zen musika, The Doorsekiko miresmen ezagunak islatuko lukeen bezala–. Izan ere, nik konfirmatu ezinezko susmo bat daukat: Echo & the Bunnymen Jim Morrisonen taldearen ibilbide diskografikoa *kopiatzen* eta jarraitzen ari zirela, eta haien laugarren diskoak, The Doorsen laugarrena bezalatsu, orkestratua izan behar zuela. Baina, hala izan bazen, Bunnymenek asmatu egin zuten kaliforniarrek *The Soft Parade* (1969) gorabeheratsuarekin huts egin zuten lekuan –oraindik ere *The Soft Parade* da, Jim Morrisonen osteko LPak alde batera utzita noski, harrera kritiko txarrena izan duen lana, The Doorsenen artean; *Ocean Rain*, ordea, argitaratu zen garaian kritika txar batzuk jaso bazituen ere, ahobatekotasun ia osoaz goraipatzen da egun–.

Disko honek, ipuin onek bezala, bi bertute funtsezko ditu: hasiera – A aldeko lehenengo kanta, *Silver*– eta amaiera –B aldeko azkeneko kanta, *Ocean Rain*, urteetan haien kontzertuak ixteko erabili izan dutena: zerbaitegatik izango da. Tartean ez dago betelanik, dena den: askok azpimarratuko lukete, jakina, *The Killing Moon* famatua –taldeak zerrenden goialdean kokatu ahal izan zuen single nagusia, klasiko *ochentero* bat–, eta, izan ere, kanta horren bitartez iritsi nintzen ni diskora. Baina denbora krudela izaten da gehiegi entzundako doinuekin, eta nire kutunen zerrendan aipatutako lehenengo biak egongo lirateke, uneotan; *My Kingdom* eta *Seven Seas* epikoak hortxe-hortxe daude, orobat – azken kanta horri dagokion maxi-singlea eta guzti daukat, oso gauza bitxia nigan, garai hartan nintzen xuhurrarekin…–.

Aitor dut kontraesan batek bizi nauela halako disko bat miresten dudala pentsatzen dudanean: bertan abesten diren kontuak ez nituzke jasango poema batean irakurri edo film batean entzungo banitu. *"All hands on deck at dawn / Sailing to sadder shores / Your port in my heavy storms / Harbours the blackest thoughts // I'm at sea again / And now your hurricanes have brought down this ocean rain / To bathe me again"*: kasik lotsa gorritzen naiz eta guzti tes-

tua hemen pikatzean. Baina musika rekin, biolin horiekin guztiekin bat egitean, auskalo nola, ergelkeria erromantikoide horrek itxuraldatze bat jasaten du, eta konbentzitzen nau. Agian, Milan Kunderak esaten zuen bezala, poesian egon ohi den lirismoan, poetak bere barne munduari hitza ematen diolako, beraren-gan dauden sentimenduak eta gogo aldarteak entzuleengan esnarazteko hain zuzen ere. Eta, Kunderarentzat, lirismoari dagokionean, “musika poesia baino are urrunago joan daiteke, gai baita barne munduko mugimendu sekretuenak antzemateko, hitzarentzat ezin iritsizkoak direnak. Badago, beraz, arte bat, kasu honetan musika, poesia lirikoa baino lirikoagoa dena”.

Kundera, zer esanik ez, musika klasikoaz ari da, baina nik uste dut, kulturaren gainbehera postmodernoko garai hauetan, arazo handirik gabe aplika dakiokeela hori pop musikari ere. Nik, behintzat, *Ocean Rain* entzutean sinesten dut maita-sunean. Kantua amaitu bezain laster sinesteari uzten diodan bezain bortizki.

**IBAN ZALDUA.** DONOSTIA, 1966
Idazlea
eibar.org/blogak/volga

## [ 40 ]

## **A WALK ACROSS THE ROOFTOPS** | THE BLUE NILE



Linn Records, 1984

Gonbida ezazue norbait etxera, atera iezaiozue kafe –edo te– bat. Gero jarri disko hau, iragarri gabe, garrantzirik eman gabe. Bolumen apalean jarri ere, nahi baldin baduzue. Zuen gonbidatua, seguruenik, hasieran ez da konturatuko, hasieran ez du –zuen gonbidatuak– ezer berezirik sentituko, hain apal, hain motel ailegatzen zaizkion doinuek eraginda. Laster zein berandu, ordea, galdetu egingo dizue “zer den” entzuten ari dena. Ordurako, Nilo Urdina eramaten ari baita zuen gonbidatua. Ordurako, seguruenik, Nilo Urdinak gela osoa hartu baitu, eta baliteke doinuen jario –itxuraz– lasaia zuen gonbidatuaren barnean ere sartu izana. Hortik aurrera konturatuko da, denbora kontua baitzen, doinu-jario –ustez eta– lasai horren baitan askotariko sentsazioak bizi daitezkeela. Itxurazko ambient geruza umelekin batera, funk eta elektronika kolpe lehorrak. Giro instrumental ilunen gainean, halako soul kantaera *behartu* bat (modu ederrean behartua). Azkenean; ibilaldi, edo txango, edota osteratxo bat. Teilatuetan, edo sabaian. Edota ez dakit nola interpretatu behar dugun diskoaren izenburua.

Arestiko guztia –antzeko zerbait– ez bada zuen gonbidatuarekin gertatzen… nik ordainduko dizuet kafea.

*A Walk Across the Rooftops* (1984). Zazpi kantu luze, geldo eta atmosferiko. Ardo on bat edatea bezalako entzunaldia. Non, eta Eskozia euritsu… zein garagardo-zalean.

Disko honi buruz esan eta idatzi izan da, beste inoiz –nik dakidala– beste ezelango diskori buruz idatzi izan ez dena; *Alternative AOR* estiloko kantuak dituela.

Alegia; underground musika dela, baita guztiz kontrakoa ere. Posible ote, tamainako *oximoron* bat? Diskoak oso ongi *iraun* du azken ia hogeita hamar urte hauetan, zenbait ardo onek bezala. Laurogeiko hamarkadako soinu ekoizpen tipikoa daraman arren. Tira; tipiko-tipikoa ere ez. Bai erraz nabarmentzekoa, baina, laurogeietan ekoitzi zela.

Zazpi kantu luze, geldo eta atmosferiko. Melodiari gorazarre eginez, modu erromantiko eta malenkoniatsuan. Kontuz, halere; zuen gonbidatua ikusten ari naiz, bera bakarrik, dantzan ari dela, *Stay* kantuarekin. Era misteriotsuan, alaitasuna baitakarkigu *Stay* kantu oroi min zaleak. “The Blue Nile taldearen sonoritateak primeran adierazten du maitemina zer den. The Blue Nile taldearen musika gertuago baitago maitemina sentipenetik, maiteminduta egotetik baino” *Melody Maker* aldizkaria, 1989. Hamar urte lehenago, Glasgow hiriko unibertsitatean zebiltzan Paul Buchanan (Ingeles literatura) eta P. J. Moore (Elektronika) elkarren ezagun ziren txikitatik, biak ere Glasgow iparreko kale berdinetan hazita, eta 10 bat urte zituztenetik musika jotzeari lotu ohi zitzaizkion oso maiz. Robert Bell (Matematikak) graduazioaren ostean ezagutu zuten, tarteko lagunek koadrilara ekarrarazia. Segidan piztu zen hiruren arteko garra. Elkarri musika entzunarazten zioten urte haietan: Mahlerren *5. Sinfonia* eta Marvin Gaye, esate baterako.

Hiru lagunak kantuak idazten hasi, eta haietariko bat argitaratu beharra zegoela erabaki zuten. Nola? Sor dezagun zigilu diskografiko bat (Peppermint Records), baina utz dezagun banaketa diskoetxe garrantzitsu baten esku (RSO Records). Modu honetan azaldu zen *I Love This Life* kantua 1981ean. Ale gutxi fabrikatu ziren, baina ongi eginiko banaketaren ondorioz singlea BBCra ere ailegatu zen. Zoritxarrez, Polygramek RSO jan zuen urte hartan, eta akabo betiko singlearen bizitza. Halere, bigarren kantu bat grabatzeko aukera izan zuten *(Tinseltown in the Rain)* apur bat lehenago; baita Calum Malcolm estudioko ingeniaria sorgintzeko ere. Taldearen potentziala berak igarri, eta Linn diskoetxerantz zuzendu baitzuen. Halere, bederatzi hilabete behar izan zuten Linn etxekoek… hiru musikariak harrapatzeko, diskoetxearen deiei ez zietelako erantzuten! Arrazoia, singlearen esperientzia eskasaren ostean, bestelako zereginetan murgildurik zebiltzan.

Grabazioa bost hilabetez luzatu zen. Aurreko hiru urtean idatziriko zazpi kantu ageri ziren bertan. Orduan, parekorik ez zeukan bestelako sonoritate bat erakutsiz. Diskoetxeak emandako diru guztia, grabazio prozesuan xahutu zuten hiru musikariek.

**FERMIN ETXEGOIEN.** OÑATI, 1966
Idazlea eta musika kazetaria
eitb.com/eu/gaztea/programak/ekaitz-perfektua

[ 41 ]

## **HATFUL OF HOLLOW** | THE SMITHS



Rough Trade, 1984

**ESKUAK UGATZ-GURUINETAN**

Gogoan dut C-60 bat izan zela. Nola ez. Pirateria analogiko zaharraren misterio hauek ondo deskribatu ditu Zalduak *Biodiskografiak* liburu berrian (2011, Erein); kantu izenak punta fineko arkatzarekin idaztearen zergatiak, adibidez. *Relleno*-aren kontua ere azaltzen du Zalduak. Disko grabaketarako formaturik arruntena zen C-60, alegia, hirurogei minutuko kasetea, eta ohikoa zen zuk ematea grabatzaileari diskoa eta grabatzaileak, bere borondatez, LParen soinuak betetzen ez zuen zatia osatzen zizun bere gustuaren araberako beste zerbaitekin, zuk preseski eskatu zenionaz aparteko zerbait, apropos estilo desberdinekoa ere sarri... Bazuen mistika polit bat hark. Kantu bat ere badut gogoan, baina gogoan bakarrik, ez baitut haren berririk beste inon aurkitu, ez Google ez kristo, eta pentsatzen hasia nago amestua ote den: *ce-sesenta* izena zuen kantu bat, eta neure aburuz, *Donosti sound* esaten zioten estilotxo hartako talderen batek jotzen zuen... *Ce-sesenta, ce-sesenta, ya no eres virgen, ya no eres pura...*

Harira. C-60 hura pasatu nion beraz Epelderi edo Osorori.  Alzelai ere biltzen zen tratuetan, eta haren bidez beste hura... ez naiz gogoratzen, Ugarte deituko diot, Casablancako trafikantea bezala. Baina nik uste dut Epeldek grabatu zidala The Smithsen *Hatful of Hollow*. Modan zeuden eta haien berri jakin nahi nuen. Bada, Epeldek disko hau zeukan eta halaxe izan zen hau The Smithsen lehenengoa niretzat. Eta sorpresa izan zen eman zidanean C-60 hura bueltan han ez zegoela rellenorik. Izatez, B aldea kantu eder-eder baten erdian amaitzen zen. *“Fifteen minutes with you, I wouldn’t...”* STOP. Hamabost minutu zurekin eta gero zer? Disko hark 60 minutu baino gehiago irauten zituen! Sekula ikusi gabekoa zen hori. Izan ere, errekopilazio bat zen, baina taldea sortu berritan egina eta kantu errepikatu birkonposatuekin ere (Peel Sessions batzuk tartean), bitxikeria, harrokeria...

Nolanahi ere, berehala kapturatu nituen C-60 hartakoak. Gaurko egunera arte, Morrisseyren bakarkako istorioaren jarraitzaile ere banaiz eta. 18-19 urte nituen orduan, The Smithsekiko maitemintze zoro hark harrapatu ninduenean. Mutil patetikoa nintzen. Tira, *teenager* kategorian nengoen oraindik, etimologia ingelesari jarraiki, baina 18 urterekin adin nagusiko bihurtzen zarela suposatzen da, ez jada hain nerabe-nerabe, baizik eta, *gazte* edo. Ba post-nerabe patetikoa nintzen, guztiz, suposatzen dut...

Eta ataka hartan, zenbat lagundu zidan musika hark. Neure ingeles apurrarekin dezifratzen nituen kantuen puska partzial gordin haiek... Kantu bat amaitzen da *“you will leave me behind, you will leave me behind”*, atzean utziko nauzu... eta beste bat berriz amaitzen da, *“I’ll probably never see you again, I’ll probably never see you again”*, ez zaitut seguruenik berriz ikusiko. Eta ez nekien zer esan nahi zuen hark guztiak, egia gordinak zirela bakarrik. Beste kantuetan ere pus-

ketak baizik ez nituen ulertzen, erraietatik sortutako haiku pop bortitzak.

*"And everybody's got to live their life / and God knows I've got to live mine"* denok dugu bizitza bizitzeko eskubidea / eta Jainkoak daki nik neurea bizi behar dudala

*"Oh the devil will find work for idle hands to do"* oh deabruak aurkituko du lanik esku alferrentzako

*"William, it was really nothing"* Guille, ez zen benetan ezer...

*"He said 'return the ring' / he knows so much about these things"* eraztuna itzultzeko esan zuen / hainbeste daki gauza hauetaz

*"I was looking for a job / and then I found a job / and heaven knows I'm miserable now"* lan bila nenbilen / eta lana aurkitu nuen / eta zeruak daki miserablea naizela orain

*"The dream is gone / but the baby is real"* Ametsa amaitu da / baina haurtxoa benetakoa da

*"Does the body rule the mind / or does the mind rule the body?"* Gorputzak agintzen du buruan / ala buruak gorputzean?

*"Please, please, please / let me, let me, let me"* mesedez mesedez mesedez / utzi, utzi, utzi... (tira, hau 60 minutuetan ez zen kabitu! Hilabeteen buruan ezagutu nuen, beranduegi, modu aski sintomatikoan kantuaren gaia kontuan hartuta)

Hainbeste bueltarekin, ingelesa ere hobetu nuen, eta ez gutxi. Baina beste gauza bat izan zen neure irakasgai nagusia, disko hark eta The Smithsek eman zidaten argia: nor izateko beste bide bat bazegoela ikasi nuen nik Morrisseyren poesian eta rock melodramatikoan. Inguruko eredu *matxote* kirolzale *panparroi* hartatik haratago bazegoela anbiguoago agertuta gizon jokatzerik, *bruto* bat izan barik sentiberatasunez gaiztakeria lantzerik, frakaso txiki baina krudelen hondarrean inteligentziaren garaipen ironikoa (intimoki beharbada) dastatzerik. Eta irakaspen horietatik, hazi, nor izan, norberaren bidea egin. Urteak igaro dira eta seme *pre-nerabe* bat dut. Hauskor eta deseroso nabari dut urte zail hauen atarian. Topatuko ahal du argi bat nik disko hartan ikusi nuenaren parekoa. *There is a light*... beste disko batekoa da hori, barkatu.

Bizitzak buelta asko ematen ditu. Ustekabekoak ere bai, eta bihotzarekin ikasi duzunak balio dizula jakingo duzu orduan. Gertatu daiteke 20-25 urte igarota zita bat izatea igande gau batean eta zaudela, bezerorik ez apenas, Donostiako Be-bopen, 80ko musika maite duen DJ batekin eta The Smiths jartzen ari dela, behin eta berriro, eta kantu guztiak dakizkizu eta abesten eta antzezten dituzu gladioloak bazenitu bezala bakeroen atzeko poltsikoan eta orduan, *Handsome Devil* jartzen du kabroi horrek. Bai, debekatua beharko luke, baina *Handsome Devil* jartzea legala da nonbait. Eta une horretan, *"let me get my hands on*

*your...”* bai, badakit ez dela esaten *titiak*, esaten da *bularrak*, baina hori ere ez da, *politori*, ez bular eta ez titi *monina*, *“let me get my hands on your mammary glands”*, eta ez didazu konbentzituko Euskaltermek ugatz-guruin esaten diolako horri ze, ez, ezin dut ebitatu eta glandula mamarioetan jarri behar dizkizut eskuak, *ya-lo-kreo, oh you handsome devil.*

**LUISTXO FERNANDEZ.** EIBAR, 1966
Blogaria
eibar.org/blogak/luistxo

[ 42 ]

## **CUANDO LA POBREZA ENTRA POR LA PUERTA, EL AMOR SALTA POR LA VENTANA**
EL ÚLTIMO DE LA FILA



PDI, 1985

El Último De La Fila ezagutu nuenean, ez zen ezer gertatzen beren kontzertu batera *azkena* heltzen bazinen, bertan leku nahikoa baitzegoen beti, eta artean *lerroak* ez ziren hain modakoak.

Udan izan zen eta, normalean, urteko sasoi hori aproposa izaten da gauza berriak deskubritzeko, denbora gehiago izaten baitugu dastatzeko eta gozatzeko. Isilka-misilka sartu ziren nire jakin-minaren zirrikituetatik; hasiera-hasieratik txunditu ninduten erabat berriak zitzaizkidan harmoniekin.

Espainola izateko oso talde berritzailea zen. Entzunak nituen Los Rápidos eta Los Burros, beren aurreko taldeak, baina azken honek, eta lerro hauekin omendu nahi dudan beren lehenengo disko honen izenak, argi eta garbi erakusten zuten talentu handia zegoela atzean: *Cuando la pobreza entra por la puerta, el amor salta por la ventana* (Pobrezia atetik sartzen denean maitasunak leihotik egiten du salto).

Eta dena gertatu zen iltzatuta geratzen zaizkigun gauzak etortzen diren gisan; izan ere, diskoa deskubritu nuen ia-ia taldea zuzenean ikustearekin batera. Zenbait aste lehenagotik nire LP gogokoenetako bat zen eta, Kordobako landazabalean abuztuko gauek isurtzen duten magiak inguratuta, kontzertu batera joateko aukera izan nuen.

Jaiak ziren Montalbán izeneko herritxoan. Lurralde hori bisitatzen nuen lehenengo aldia zen niretzat: jende berria, hizkuntza berria (bertan hitz egiten den gaztelerak antz txikia du Burgosekoarekin), gauza berriak zaharrei gailenduko zitzaizkielako ezinbesteko itxaropena, nire bizitzako garai ilun bat gainditzeko... eta hori guztia *Querida Milagros* edo *Dulces sueños* abestien doinuek apainduta eta izarrak zirela eszenatoki bakarra.

Musikalki hainbat aukera gehiago egin nitzakeen arren, niretzako berezia izan den disko batez idazteko proposatuta, pentsatu nuen modu polita zela hau diskoari omenaldia egiteko eta ordainean emateko egun batean berak jakin gabe eman zizkidan gauzak.

**ADOLFO MARCO.** PEDROSA DE RÍO URBEL (BURGOS), 1962
Musikazalea

[ 43 ]



## **PSYCHOCANDY** | THE JESUS & MARY CHAIN

Blanco y Negro, 1985

**NIRE PUNKA**

Institutuko koaderno eta klasifikadoreetan *Punk, Oi, Sex Pistols* eta GBH idatzi, A biribildua eta gandor amaigabeko *punki*-ak nahiz kateorratzak marrazten genituenerako, punka gauza gutxi zen, estetika ikusgarri eta slogan finko batzuez aparte. *No Future.* Euskal Herrian une gorenean egongo zen, baina berandu zen punkarentzat, heroina bere lana egiten hasia zelako eta hardcorea bide berriak irekitzen hasia zelako. 1985a zen The Jesus and Mary Chainen berri lehenengo aldiz izan nuenean.

25 urte baino gehiago pasatu dira, baina oraindik gogoratzen dut eszena. Ni, 15 urterekin, iluntzean, Herri Irratiko *Azken furgoia* saioa gelako bakardadean entzuten, eta bat-batean izen iradokitzaile horren atzean (Jesus eta Mariaren katea!!) zer ezkutatzen zen deskubritzen. *Never Understand.* Labana-gitarrak, erritmo finkoko bateria kolpeak, akorde bakarreko baxua, oihuak… eta Jim Reiden ahots goxoa, melodia soil baina erabat itsaskorra xuxurlatzen. Egun hartan zerbait aldatu zen musikaren (nire) munduan. Artean ez nituen ezagutzen Stooges eta Velvet, Suicide eta Phil Spector, baina Jim Reidek (ahotsa, gitarra), bere anaia Williamek (gitarra, ahotsa), Douglas Hartek (baxua) eta Bobby Gillespiek (bateria) zerbait berria eskaintzen zuten. Iraultzailea. Punka. *Never Understand*-en atzetik, *You Trip Me Up* etorri zen, are biziatuagoa eta zaratatsuagoa, eta soinu horma haren atzean eztizko melodiak ezkutatzen zirela erakusteko, *Just Like Honey. Pop delicatessen*-a.

*Psychocandy* aurreneko aldiz nerabe zarenean entzuteak inpresionatu egiten du. Bertan biltzen delako rock'n'roll disko bati eska dakiokeen guztia. Kaosa, probokazioa, hedonismoa, lurrera begira ia mugitu gabe dantza egiteko erritmoak... baina baita poparen goxotasuna ere. Alde horretatik, gutxitan izan da disko baten izenburua hain adierazgarria. *Psychocandy* gozoki bat baita, gozoki pozoitu eta anfetaminikoa. Erromantizismo berriak, pop dantzagarriak eta mainstream helduak menderatutako Erresuma Batuan –gogoratzen Spandau Ballet, Duran Duran, Eurythmics, *Brothers in Arms*-eko Dire Straits?– bonba baten pare eragin zuen diskoa. Ez zuten salmenta zerrendetan gora egin baina diskoaren oihartzuna energia atomikoa bezala hedatu zen. Nola ulertu bestela,

Ride, The Telescopes, Ultra Vivid Scene, My Bloody Valentine, The Primitives, Loop eta (zergatik ez?) Pixiesen lana.

**MIKEL LIZARRALDE.** BERGARA, 1970
Kultur kazetaria
berria.info

[ 44 ]

## **WHITES OFF EARTH NOW!!** | COWBOY JUNKIES



Latent Recordings, 1986

Zuriak Lurretik kanpora orain!! Ez da proposamen txarra. Bono, Fito, Sting, Phil Collins, Muse... zuriak dira eta mundu (musikala behintzat) hobe batean biziko ginateke eurak barik. Baina ez zenuke liburu hau esku artean edukiko eta ez genuke *diskazo* hau entzuteko aukerarik izango; goazen harira, beraz.

Niri diskoak baino kantuak gustatzen zaizkit gehiago eta normalean kantuaren lehenengo konpasetan dakit gustatuko zaidan ala ez. Kantu ZUZENAk, GORDINAk, FRESKOAk... GUTXIREKIN ASKO ESATEN DUTENAK. Baina badaude beste mota bateko kantu eta diskoak, lehenengoan gustatzen ez zaizkizunak eta, hala ere, behin eta berriro hartzen dituzunak gustatu arte, *zeozer* daukatelako. Kategoria honetan sartu behar dut Cowboy Junkiesen diskoa, eta hau da gure istorioa:

Biniloz beteriko etxe batean bizi nintzen. Punk, hard rock, rockabilly, garage, hardcore, rhythm'n'blues... niri gustatzen zaizkidan kantu GORDIN eta ZUZENez beteriko bilduma. Baina aitak ez zidan biniloekin ibiltzen uzten (noizbehinka jartzen nituen baina arriskutsua zen!!). CDak heldu ziren eta horrek musika lasai entzuteko aukera eman zidan. Eta etxera heldu ziren lehenengo CDen artean bazegoen Cowboy Junkiesena. Suabeegia, motelegia, kantu luzeegiak: ez zitzaidan gustatzen... Baina *zeozer* zeukan eta urteak joan ahala (aitak azkenean utzi zidan biniloak erabiltzen!) gehiagotan entzun nuen, txortan egiten, *bixamun* domeketan, nobiak utzi eta deprimituta nengoenean, ikasten, siesta botatzeko... nire disko kuttunetakoa izan arte.

Beharbada erakarri ninduen *zeozer* misteriotsu hori ez da hain misteriotsua: disko hau egun batean grabatu zen, zuzenean estudioan, mikrofono bakar batekin eta efekturik gabeko baxu, gitarra, bateria eta ahots batez baliatuz. Disko GORDIN eta FRESKOA beraz, GUTXIREKIN ASKO ESATEN DUENA.

**LON FERNANDEZ.** BARAKALDO, 1977
Musika jartzailea eta Bilbo Hiria irratiko kidea
bilbohiria.com

**[ 45 ]**

## **SISTER** | SONIC YOUTH



SST, 1987

### UNDERGROUNDARI AGUR ESATEN?

*Sister* 1987an argitaratu eta Espainian atera zen Sonic Youthen aurreneko diskoa izan zen. Grabaciones Accidentalesek kaleratu zuen. Egia esan, bitxia ere izan zen disko hori argitaratzea erabaki izana, sasoi hartan ez baitzen oraindik talde famatua. Orduko musika aldizkari nagusiak ziren *Rockdelux*-ek eta *Ruta 66*-ek ez zioten artean ia kasurik egin. Zenbait urte geroago azalak eskainiko zizkioten. Uste dut orduan Blast First diskoetxe ingelesaren erreferentzia nagusiak argitaratzen ari zirelako eman zutela argitara diskoa. Inportazioko diskoak lortzea nahiko garestia zen. Material zail apur bat ekartzeko arriskua hartzen zuten denda espezializatuetan erosi behar ziren –nik Universalen erosi ohi nituen, Bilboko Ledesma kalean– eta, batez ere, posta bidez. Orduan ez zegoen internetik eta informazioa eskuratzea ere ez zen erraza. *Maximumrockandroll* eta *Flipside* fanzine estatubatuarrak erreferentzia garrantzitsua ziren niretzat. Gure rock eskolarik onena Paloma Chamorroren *La edad de oro* programa izan zen, 1983 eta 1985 urteen artean TVEn eman zutena –orduan telebista kate bakarra–. Han ikusi genituen zuzenean Alan Vega, Nick Cave, Tom Verlaine, Psychic TV, The Lords of the New Church, Residents, Johnny Thunders…

Sonic Youth penintsulara ekarri zuen aurreneko bira 1988koa izan zen. Urriaren 5ean, asteazkenarekin, Gasteizko The End aretoan jo zuten. Karteletarako *Sister* diskoko irudiak erabili ziren eta sarrerako irudia, taldearen argazkiarekin, *Evol* aurreko diskoaren kontraportadatik aterata zegoen. Antza denez, kartela izugarri gustatu zitzaien Sonic Youtheko kideei, geroago haien bideoklip dibertigarrietako baten eszenografian erabili baitzuten.

Kontzertu benetan gogoangarria izan zen. Nik aurreneko ilaran pasatu nuen kontzertu osoa. Thurston bereziki piztuta egon zen. Gitarrarekin jolasten, publikoari eskaintzen… Kontzertuaren ondoren *backstage*-ra pasatu nintzen, eta taldea elkarrizketatu ahal izan nuen. Bertan zeuden eurak. Batez ere, Kim Gordonek egin zidan kasu, modu oso adeitsuan, eta berak erantzuten zituen galdera guztiak. Hartu ez nuen jatekoa eta edatekoa eskaini zidaten. Vodka zukuarekin ari ziren edaten. Steve Shelley bere bateria jasotzen egon zen. Lee Ranaldo berera zegoen. Thurstonek sandwichak jaten zituen bitartean erantzuten zuen, askotan esaldi nahiko inkoherenteak esanez. Kontzertuaren ostean *subidoi* handia zuen.

Bira hori *Daydream Nation*-en Europako bira izan zen, hemen oraindik disko hori argitaratuta ez bazegoen ere. Zuzenean ikusi eta gutxira, orduan aurkeztu zuten diskoaz gozatu ahal izan genuen –hasieran inportaziokoa bakarrik–. Bestalde, disko hori izan zen –popetik hurbilago zeuden kantuak baitzituen–



geroago *indie-rock* edo *indie-pop* deituko zenaren hasiera, hemengo taldeei eragin zien estiloarena, esate baterako El Inquilino Comunistari –93ko uztailean Madrileko Aqualungen haien aurretik jo zuten kontzertu bikain batean–. Soinu berri baten hasiera izan zen, eta *Rockdelux* aldizkariak publikazio berria

sortu zuen horren berri emateko: *Factory*. Neurri batean, Acuarela diskoetxearen hazia izan zen eta, horrekin batera, Benicassimgo jaialdiarena. Zerbait berria sortua zen, Nirvana telonero zuela Sonic Youthek egin zuen birari buruzko *1991 The Year That Punk Broke* dokumentalean deskribatzen den bezala.

*Sister* aldaketa diskoa da Sonic Youthentzat. Talde heldu eta finkatu baten diskoa da. Steve Shelley baterian zuen bigarren diskoa da, eta ordurako guztiz ezinbestekoa zen. Taldearen jaiotza ikusi zuen New Yorkeko *no wave*-aren eraginetik urrun. Aurreko lau lanetako noise, punk eta iluntasuna gorde eta, era berean, esperimentazioan eta bide berrien bilaketan jarraitu zuten. Bazekiten handiak zirela. Bazekiten soinu propioa eta botere propioa zutela, eta horregatik desmitifikatu zituzten beren heroiak. Hortik aurrera iritsiko zitzaien merezitako arrakasta.

**TXEMA AGIRIANO.** BILBO, 1965
Arte kritikaria, ikertzailea eta komisarioa
mamorro.blogspot.com
musicaexmachina.com

[ 46 ]

## **ENCINA Y COBRE** | EL CABRERO

Ediciones Senador, 1988



**LUIS DEMANO.** ALACANT, 1976
Ilustratzailea
luissdemano.blogspot.com

[ 47 ]

## ...BIDEHUTS ETA ETXEHUTS | BAP!!



Basati Diskak, 1988

Disko bakarra aukeratzea ia ezinezkoa den arren, Euskal Herriko bat hautatu dut. Andoaingo BAP!! taldea oso kuttuna da niretzat, eta Euskal Herrian ez da gerora sortu berau ordezkatu edo haren itzala ahantzarazi didanik; inor izatekotan Hondarribiko Dut, baina niretzat azken honek ez zeukan Babarruna ta Aza Potolo, Brigada Anti Polizia edo nork daki benetako zer adiera zuen taldearen pareko ezaugarririk.

BAP!!-en diskoetatik *Zuria beltzez* da landuena, baina nahiago dut orriotara *...bidehuts eta etxehuts* ekarri, nire belaunaldiko askorengan izan zuen eraginagatik; eta garai eta pentsaera zehatz batzuk erretratatu zituelako. Egia da ezin dudala RIP taldearen *No te muevas* diskoa albo batera utzi, amorruz, egiaz eta gazteriaren eresiz josita dagoelako eta kantu horiek guztiak zainetan tatuatuta ditudalako, baina BAP!!-ek beste zerbait eman dit.

Lehen notizia Egin egunkariak kaleratutako *Bat, bi, hiru… hamar!* bilduman izan nuen, han aurkitu nuelako *Atzera begira* kantu hunkigarria 1987an. Euskal musika eta heltzear zegoen hardcorea (punkaren garapena) batzen zituen. Gerora deskubritu nuen 1986an *Condenados a luchar* bildumarako grabatutako *Palabras de engaño* azkar eta garratzagoa. 1988an, Donostiako Basati Diskak zigiluak Leitzaran zeharkatuko zuen autobideari aurre egin zion lana kaleratu zuen, honako hau.

Punkaren eztandako taldeek ordura artekoari ezetza adierazten zioten, errebelatuz. BAP!!-ek, baina, hardcorearen mamia bere eginda, errebeldia kontzienteago bat plazaratu zuen. Amorrua zuten, baina bazekiten zeinen kontra jo aldaketa bultzatzeko: baserriak babestu, trantsizioaren adarjotzea salatu, norbanakoak mobilizatu, autobiaren kontra egin, naturaren alde, espekulatzaile desarrollisten kontra, Israelen krudelkeria...

BAP!! 80ko hamarkada bukaeran eta 90eko hamarkada hasieran, gaztetxe eta gazte asanblada mugimendu askoren ispilu eta, era berean, eredu izan zen. Taldekideak ezin ziren Andoaingo gaztetxea gabe irudikatu, eta beraien hitzak, pentsaera eta lan egiteko modua, modu aske, autogestionatu eta antolatuan irudikatzen genituen.

Gainera, Europako musika undergroundean erreferente ziren taldeetako askok Euskal Herria bisitatu zuten, hain justu Andoaingo gaztetxea. Horri esker, andoaindarrak hemen ohikoak ez ziren bestelako lengoaia eta baloreak lantzeko gai izan ziren. Punketik haratago, amorruari abiadura gehitu eta hori guztia kanalizatzen jakin zuten. Eta ez hori bakarrik, erakutsi zuten euskaraz ere egin zitekeela, Eskoria-Tza! taldearekin batera pausu hori ematen lehenak izan zirelako.





* Oharra: Disko honen eskubideak Esan Ozenkik eskuratu zituen, eta *...bidehuts eta etxehuts!* disko osoa bonus gisa jasota dago diskoetxe berak kaleratutako *Zuria beltzez* CDaren baitan. Seguruenik eskuragarri egongo da Metaken katalogoan, gaur egun Elkarren baitan.

**IKER BARANDIARAN ZUBIATE.** ARRASATE, 1972
Musika kazetaria

[ 48 ]

## **CALIFORNIA** | AMERICAN MUSIC CLUB



Frontier Records, 1988

Aldaketa bat suposatu zuelako nirean.

Ordura arte Hüsker Dü, The Birthday Party / The Bad Seeds, Dead Kennedys, Sonic Youth, The Smiths edo beste-ez-dakit-zer-talde aukeratuko nuelako, gaur egun horietako edozein ere aukeratu nezakeen.

Baina, benetan eta serio, disko honekin barruan zerbait aldatu zitzaidalako.

Oso kantu soilak ziren, entzuten nituen beste batzuk bezalakoak, beraz horrek ez du balio aitzakia bezala. Baina bat-batean elastiko urdin eta grisa ("*I sat up all morning and I waited for you / With my blue and grey shirt on / Yeah that's my favorite one / I sat up all morning so why did you call? / 'cause now i just sing my songs / For people that are gone from now on*") edo *Jenny* ("*Here you are again / Another stupid party again / Everyone here thinks that when they die / You will be there to let them in / Jenny don't go / Please don't go home now*") grabatutako zinta hartatik disko batera pasatzeko beharra sentitu nuelako.

Ordura arte guztiz ezezagunak zitzaizkidan Mark Eitzel, Vudi, Dan Pearson eta Tom Mallon nor ziren jakin behar nuelako bai ala bai.

Aurretik besterik grabatu ote zuten jakitea niretzat ezinbestekoa zelako –Internet gabeko nerabe eta nerabe berantiarrok nola egin geniezaiokeen aurre horrelako egoera bati?-. Aldizkari musikaletan inoiz artikulu edo elkarrizketarik galdu ote nuen atzera begira hasi nintzelako.
Disko honek barnean gordetzen duen *Western Sky* ("*Time for me to go away / I'll get a new name, I'll get a new face / Time for me to go away / No I don't belong in this place*") kantuari esker Nick Drake ezagutu nuelako.

Disko bakar bat aukeratu behar dudan lehenengo aldia delako.
Disko honekin, aukeraketaren proposamena jaso eta ia berehala akordatu naizelako.

Euskal disko bakar bat aukeratzea are zailagoa egiten zaidalako.

Gaur egun disko hau entzun eta lehen aldi hartako zirrara hura ez, ezinezkoa litzateke, baina oraindik zerbait eragiten didalako.

**ASIER ZULUETA.** ANDOAIN, 1970
Musika argitaratzailea
bidehuts.net

[ 49 ]



## **PLATAFORMAN** | DANBA

Tsunami, 1989

**NOIZKO?**

Zer energia kontsumo behar dugu bizitzeko? Ondo bizitzea nahikoa al da, ala hobeto bizi nahi dugu, etengabean? Petrolioa errazionamenduan sartzen denean, orduan zer? Noiz jarriko ditugu martxan kutsadura murrizteko baliabideak? Benetan behar al ditugu hainbeste auto? Mugikortasuna mugatu behar al dugu? Gure erosotasun mailari uko egiteko prest al gaude? Elikadura-subiranotasuna posible al da? Nolakoa izan behar du industriaren eta nekazaritza, arrantza eta abeltzaintzaren arteko orekak? Monolaborantzak nor aberasten du? Patroiek zergatik irabazten dute horrenbeste? Zertan datza eskubide hori? Inor al dira langilerik gabe? Lan intelektuala eta praktikoa bateragarriak al dira? Bata egiten duenak bestea ere egin al dezake? Administrazio edo zuzendaritzatik produkziora pasatzeko gai izan behar al dugu? Eta alderantziz? Arduren errotazioaren alde al gaude? **Noiz arte egin beharko dut lan nik? Noizko jaia eta gero jaia? Noiz langilearen urtea eta ez bakarrik eguna? Noiz emango digute noiz sei hilabeteko oporraldia?** Enpresariak, ideia berea dela esaten duenean, zer esan nahi du, jenio bat dela, ala kopiatzen oso ona dela? Zer portzentaje betetzen du armamentuaren industriak Euskal Herrian? Ezagutzen al da sozialki portzentaje hori, eta ados al gaude? Tankeak produzitzen ditugu? Eta fusilak? Banketxeen eskutan bagaude, seguru al gaude? Bidezkoa al da banketxeek horrenbesteko boterea izatea? Abiadura bizia kalitatezko abiadura al da? Errepide gehiago behar ditugu? Natura pribatua ala publikoa da? Eta etorkizuna? Lider bat sostengatzea fidagarria al da, politikari konkretu bat sostengatzea? Zergatik hartzen dira erabakiak goitik behera, eta ez behetik gora? Nork dio ez garela erabakitzeko gai? Boterera iritsi nahi dugu? Boterea justua al da? Elizak nolatan du hainbeste ondasun? Sexuarekiko buruko itxikeria hori bertutea al da? Bai? Garrantzitsuagoa al da azpiegituretan kulturan baino gehiago inbertitzea? **Noizko gazteentzako lokalak? Noizko kanuto bat dohainik? Noiz izango dira inauteriak urte osoan? Noiz bukatuko dugu *aprobetxategi* guztiekin?** Hezkuntza askea eta sortzailea al dugu? Nahi duguna ikasten dugu? Etorkinekin gorpuzten dugun harreman mota berdintasunezkoa al da? Nor da migratzailea, eta nor ez? Nola ziurtatuko dugu euskararen biziraupena, inguruko erdaren ondoan hizkuntza minorizatua dela kontuan harturik? Euskaraz bizitzea posible al da egun? Telebista osasuntsua al da? Ez al dago zabor gehiegi telebistan? Ez al dugu polizia gehiegi kaleetan? Eta ez al da bortitzegia polizia hori? Debekatzea debekatuko al zenuke? Droga guztiak legeztatuz gero, eta baita prostituzioa ere, adibidez, orduan mafiak desagertuko lirateke ala gehitu? Nork ez du indarkeria erabiltzen? Nor dago libre indarkeria gaitzestetik? Sendabelarrak monopolizatzeko eskubidea al du industria farmazeutikoak? **Noiz zazpiak egingo dira bat? Noizko atea utzi zabalik? Noiz etorkizuna berdea eta ez iluna? Gorria eta ez iluna? Noiz arte egon beharko dugu sistema honen menpean? Noizko Euskal Herri euskalduna?**



**Noiz arte iraungo dugu honela?** Ohartzen al gara mundu globalean dagoen miseriaz? Ezikusiarena egitea humanoa al da? Berekoiak al gara izatez? Irabazleak eta galtzaileak egon behar al dute? Kritika hutsean geratzen denak zerbait egiten al du aldaketarako? Iraultzak beldurra ematen al digu? Iraultza bat beharrezkoa da, ala sistema gozoki aldatuko da? Zerbait egin dezakegu? Zerbait egin nahi al dugu? Sistema kapitalistaren morroiek aldaketaren aurrean era baketsuan jardungo al dute? Ala biolentziari beste izen bat jarriko diote? Garapenak muga bat al du? Muga horretatik gaindi al gaude? Sozialistak gara? Zer da sozialismoa egun? Eta anarkismoa, zer da? Idealistak al gara? Edo kapitalistak funtsean? Gozoak ala gaziak gara? Behean gaude ala goian? Imajinatzen duzu mundu berri bat? Izango zinateke gai mundu berri hori irudikatu edo esplikatzeko? Galdera hauek guztiek aztoratzen al zaituzte? Ala zuri bost? Beste galderarik bururatzen zaizu? Galdera gehiegi direla uste al duzu? Izango zinateke gai honako galdera hauei banan-banan erantzuteko? Nahiko zenuke gelditzea nire jarioa? Nor gara, eta nor ez? Zerbait ikasi al dugu? Badakigu nora goazen? Atzamarrari begiratzen diogu ala ilargiari? Bat guztiontzat, eta guztiok batentzat? Positibo ala negatibo? Ala biak?

Danba taldearen *Plataforman* diskoa, 1989. urtekoa.
Ezin esan ahalko da diskoa atzokoa denik, ezta atzo aurreko egunekoa ere...
Baina *Noizko* abestiaren letrak gaurkotasun kutsu bat badu...
Eta saxo hark hankak dantzarazten dizkit oraindik...

**IKER YURREBASO.** IGORRE, 1979
Musikazalea



## BARKATU, AMA | M-AK

IZ, 1989

**BERRIRO EGINGO NUKE, AMA**
Gogoan dut zinta hura. Eta inoren autoan ematen nizkion bueltak, biniloan baditut M-ak taldearen beste disko batzuk, baina *Barkatu, ama* zintan neukan.

88an izan zen, M-ak gaztetxean ikusi nituen lehen aldia. Gerora zuzenean maiz ikusi nituen, Bilboko plaza berrian edota Altsasuko pagadi batean, Kortaturekin azken aldietan, gogoratzen ditudan azkenak. Ez zuten agur kontzerturik egin, eta joan ez balira bezala gogoratzen ditugu oraindik.

80ko hamarkadan sortutako taldeak, oraindik maiz aipagai izaten jarraitzen du gure artean, musikazaleon artean. Erremix kultura, nostalgia, garai zaharragoen aitortza, talde ezohikoa... gauza asko entzuten dira oraindik. Gogoko nituen eta aitor dut.

Diskoa aipatzean, giroa aipatu gura nuke. Taldea azpimarratzean, osteko urteetan musikarengan izan duen eragina, musikari bakoitzak, sortzaileak oro. Maiz aipatzen da Kaki Arkarazo, ordurako gitarra-jotzaile, musika esatari bezala eta teknika lantzen iaioa zena, bide oparoa eta ezaguna oso egin duena. Edo Mikel Irazoki, Berako harrobitik, musikaren zeruraino heldu bide den baxu-jotzailea, orduan eszenatoki gainean zegoen gitarra apal jotzailerik modernoena. Leitza bateria, beranduago Tapia eta Leturiarekin ere ikusi genuen. Estilo aparta, lehen lerroan beti bateriarekin, gitarra edo baxuaren parean... ahaztezina estiloa.



Xabier Montoiak, bakarkako bideari eutsi zion gero. Horretan jarraitzen du zorionez, beti musikari eta lagun apartak bidaide dituela. Euskal Herriko musika beltzaren aitzindari, garai zuriotan.

*Barkatu, ama* diskoa entzuten jarri eta lotura ezberdinak egin ahal ditugu, oharkabean. Batez ere, gerora suposatu dutena azpimarratzeko. tt, etortzear zeuden talde berri askoren oinarri izan ziren (Negu Gorriak, Deabruak Teilatuetan...), sorkuntza aldetik Xabier Montoia bera literatur bide oparo baten jabe egin da hurrengo hamarkadetan, eta memorian geratuko zaizkigu *Euskaldunon Egunkaria*-n astero idatzi genituen gehigarriak ere, diskoaren izen bereko izenburuarekin.

Egia esan, berriz egiteko, entzuteko, gozatzeko, dantzatzeko gogoa sartzen zait. Ez dut damurik.

**PATXI GAZTELUMENDI.** LARRABETZU, 1972
agit pop 2.0 @ Hori Bai gaztetxea
gaztelumendi.org / ekultura.net

**[ 51 ]**

## PARSIFAL. RICHARD WAGNER
STAATSKAPELLE BERLIN / ZUZ. DANIEL BARENBOIM




Teldec, 1989

**'PARSIFAL': IRAKURKETA 'KOMUNISTA' BAT**

Erromantizismoan, musikak bere rola aldatu zuen: ordurako ez zen hitz bidez emandako mezuaren laguntzaile hutsa, bere-berea zuen mezu bat zeukan/igortzen zuen, hitzen bidez emandakoa baino *sakonagoa*. Rousseau izan zen musikaren adierazpen ahalmen hori argi eta garbi artikulatu zuen lehenengoa, aldarrikatu zuenean musikak, hitzezko mintzamenaren ezaugarri afektiboak besterik gabe imitatu beharrean, "berez hitz egiteko" eskubidea izan behar zuela; hitzezko mintzamen engainagarrian ez bezala, musikan, Lacan parafraseatuz, egia bera ari da hizketan. Schopenhauerrek idatzi zuen musikak zuzen-zuzen aurkezten/azaltzen duela nahimen *noumenala*; mintzamena, ordea, irudikapen *fenomenalera* mugatuta geratzen da. Musika da subjektuaren egiazko bihotza azaltzen duen substantzia, Hegelek *Munduaren Gaua* deitu zuena, muturreko ezezkotasunaren amildegia: musika hitzez haragoko egiazko mezuaren eramaile bihurtzen da, Ilustrazioko *logos* arrazionalaren subjektutik Erromantizismoko "munduaren gaua" subjektura igaroz, hau da, subjektuaren muinaren metafora Egunetik Gauera igaroz. Hemen topatzen dugu Misteriotsua: jadanik ez kanpo-transzendentzia, baizik eta, Kanten bira transzendentalari jarraiki, Gauaren desmasia subjektuaren bihotzean bertan (Hilgabearen dimentsioa), Tomlisonek "subjektu kantiarra markatzen duen barneko bestemundukotasuna" deitu zue-

na. Musikak igortzen duena ez da jadanik *arimaren semantika*, hizkuntzazko esanguraz harago azpian dagoen *jouissance*-jario *noumenala* baizik. *Noumenal* hau eta Kant aurreko jainkozko Egia transzendentea errotik desberdinak dira: desmasia helezina da subjektuaren muina bera eratzen duena.

Operaren historian, bizi-desmasia sublime hori bi bertsio nagusitan suma daiteke, italiarrean eta alemanean: Rossini eta Wagner. Sublime rossinitarraren eta wagnertarraren aurkakotasuna bat dator guztiz Kanten sublime matematikoaren eta dinamikoaren arteko aurkakotasunarekin: Sublime rossinitarra matematikoa da, gainezka dituen eskaeren kopuru hutsa konprenitzeko subjektuaren ezgaitasuna aurkezten du; Sublime wagnertarra, ordea, dinamikoa da, eskaera Bakarraren oroz gaineko indar kontzentratua aurkezten du: maitasun eskaera baldintzarik gabea. Esan daiteke halaber Sublime wagnertarra emozio absolutua dela.

*Parsifal*-en, grina ezin da jadanik gainditu birgizarteratzearen bidez, bertan modu gentrifikatu batean bizirik iraun dezan: grina zeharo ukatu behar du batek, erlijiozko *jouissance*-aren (gozamenaren) estasizko aldarrikapenean. *Parsifal* hasieratik bertatik lan zeharo anbiguotzat hartu zuten: artea goren-gorenean berriro aldarrikatzeko ahalegina, Komunitatea bateratzen duen ikuskizun proto-erlijiosoa (artea erlijio eta politikaren arteko bitartekari), bizimodu modernoak bere kultura *kitsch* komertzializatuarekin dakarren usteltze utilitarioaren aurka; baina, aldi berean, noraezean lerratuz ordezko erlijio baten estetika *kitsch* komertzializatu baterantz, faltsutze bat, inoiz bat izatekotan. Bestela esanda, Parsifalen arazoa ez da bere unibertsoak duen bitartekaririk gabeko dualismoa (Klingsorren sasiatseginen erresuma versus Grialaren esparru santua), bere aurkakoek duten distantzia falta, haien oinarrizko identitatea baizik: ez al da Grialaren errituala (obrak duen ikuskizun estetiko gustukoena eskaintzen duena, pare bat *biggest hits*) azken faltsutze *klingsortarra*? (*Parsifal*-en gure gozamenean fede txarraren kutsua Pucciniren gure gozamenean fede txarraren antzekoa da.)

*Parsifal*-ek musikaren ahalmen (salbatzaile)arekiko uste on *naif* osoa gordetzen du, eta ez du arazorik topatzen erritualaren ikuskizun estetikoan jainkozko dimentsio *noumenala* eskaintzeko.

*Parsifal*-en, Amfortas eta Parsifal bera norbanako kementsu gisa nabarmentzen dira; ez al dira Amfortasen bi *kexak Parsifal*-eko pasarte indartsuenak, subjektibitateari ukoa eskatzen duen mezuaren azpijana inplizituki eginez? Aurkakotasun musikala, *Parsifal*-en, Grialaren komunitateak duen koru-estilo garbiaren eta Klingsorren unibertsoak duen kromatismoaren artean.

Hori al da, baina, irtenbide bakarra? Demagun Parsifal-ek seinalatzen duela halaber beste norabide bat, kolektibo berri baten azaleratzea. Tristanek erredentzioa aurkezten badu estasizko ihesbide suizida gisa ordena sozialeTIK, eta Meistersingerrek integratze etsia indarrean dagoen ordena sozialeRA, *Parsifal*-ek bere aldetik amaiera ematen dio Sozialaren forma berri baten asmazioari. Parsifalen “Argitan jarri Griala!” (“*Enthüllt den Graal!*”) deiarekin batera igarotzen gara Grialaren komunitatetik –ordena itxitzat hartuta, non Griala jakitunen zirkuluari baino ez

baitzaio erakusten, aginduriko denboran, erritual baten bidez– ordena berri batera, zeinean Griala denbora guztian erakusgai mantendu behar den: “Ez da berriro itxiko leku santua!” (“*Nicht soll der mehr verschlossen sein!*”). Aldaketa horren ondorio iraultzaileei dagokienez, gogoratu Nagusia pertsonaiaren patua *Tristan-Maistersinger-Parsifal* opera hirukotean (Marke erregea, Hans Sachs, Amfortas): lehenengo bi lanetan, Nagusiak bizirik dirau malenkoniaz beteriko pertsonaia atsekabetu gisa; hirugarrenean, KARGUTIK KENDU egiten dute, eta hiltzen da.

Hortaz, zergatik ez irakurri *Parsifal* gaur egungo ikuspegitik: II. Ekitaldian Klingsorren erresuma fantasmagoria digitalen, jolas birtualen eremua da; Harry Kupfer zuzen zen Klingsorren lorategi magikoa bideo-areto baten moduan taularatzean, eta Lore-Neskak gorputz femeninoen zatikitan xehe-xehe eginda (aurpegiak, hankak...) sakabanaturiko TV-pantailetan agerian jartzean. Klingsor ez al da Matrix Master halako bat, errealitate birtuala manipulatzen duena, Murdoch eta Bill Gatesen arteko konbinazioa? Eta II. Ekitalditik III. Ekitaldira igarotzen garenean, ez al gara igarotzen ari sasi errealitate birtualetik *errealaren mortura*, naturaren funtzionamendu *normala* bidetik aterarazi zuen hondamendi ekologikoa gertatu ondorengo *lur eremura*? Parsifal ez al da eredu bat Keanu Reevesentzat *The Matrix*-en, Laurence Fishburne lagun Gurnemanzen rolean?

Hala, bada, bat tentatuta dago erantzun arrunt zuzen bat emateko galderari: zer arraiotan aritu zen Parsifal bere bidaian, II. eta III. Ekitaldien artean pasatzen den denbora luzean? Benetako Griala jendea dela, jendearen sufrimendua. Demagun berak giza miseria, sufrimendua eta esplotazioa soilik ezagutu zuela. Hortaz, demagun kolektibo BERRIa alderdi iraultzaile baten antzeko zerbait dela, demagun baten batek arriskua hartzen duela *Parsifal* Brechten *Antzezlan didaktikoen* (*Leherstücke*) aurrekari gisa irakurtzeko, demagun sakrifizioari buruzko haren mintzagaiak bidea irekitzen diola Brechten *Hartutako Neurrien* (*Die Massnahme*) gaiari, Hans Eislerrek, Berg eta Webernen ondoren Schoenbergen hirugarren ikasle handiak, musikatu zuena. Gaia ez ote da bietan, *Parsifal*-en eta *Die Massnahme*-n, ikasketarena? Heroiak ikasi behar du nola lagundu jendeari sufrimenduan. Ondorioa, ordea, aurkakoa da: Wagnerrengan errukia, Brecht/Eislerrengan norberaren errukiari amore eman ez eta zuzenean ekiteko indarra. Hala ere, aurkakotasun hori bera erlatiboa da: partekatzen duten gaia ERRUKI HOTZ, URRUNarena da. Brechten ikasgaia erruki HOTZAren antzea da, sufrimenduarekiko errukia, besteei laguntza emateko berehalako premiari eusten irakatsiz; Wagnerren ikasgaia ERRUKI hotza da, santu jarrera urrundua (gogoratu Syberbergen bertsioan Parsifalek neska hotzaren antza hartzen duela), hala eta guztiz ere, errukia gordetzen duena. Wagnerren ikasgaia (eta Wotan/Odin-en sena), alegia, askatasun ekintzarik handiena denez nahitaez gertatu behar duena onartu eta aske aurkeztea, harrigarriro errepikatuta dago Brechten *Antzezlan didaktikoen* oinarrizko ikasgaian: ikaskideek hilko duten mutil gazteak ikasi behar duena zera da, *Einverständnis*-aren (konformidadearen) antzea, norberaren hiltzea onartzea, dena den, gertatuko da eta.

Eta zer esan aukera horrek argi eta garbi oinarrian duen misoginiaz? Ez al da izango Parsifalek lehenengo bi obren ustekizun partekatua, haien maitasun aldarrikapena (estasizko gortesau maitasuna, ezkon maitasuna), ezeztatu

egin zuela, komunitate huts-hutsik maskulino bat hautatuz? Hala eta guztiz, demagun, hemen ere, Syberberg zuzen zegoela: Kundryren musuaren ondoren, (histeriazko-sedukziozko) emetasunaren arbuio betean, Parsifal emakume baten gisa antzaldatzen da, jarrera subjektibo femenino bat hartzen du. Eta aurrean daukaguna komunitate sagaratu *erradikal* bat balitz, emakume hotz bihozgabe batek, Joana Arc-eko berri batek, gidatua? Eta zer esan Grialaren komunitatea iniziazio zirkulu itxi elitista bat delako usteaz? Parsifalen azken manuak Griala agerian jartzeko azpijana egiten dio elitismo/populismo alternatiba faltsuari: egiazko elitismo guztia unibertsala da, guztiengana eta denari zuzendua, eta badago zerbait berez-berez arrunta ezkutuko jakituria gnostiko iniziaziozkoei buruz. *Parsifal* operaren maitale ugariek kexa izan ohi dute: opera handi bat, bai, edertasun hunkigarrizko pasarte ugari barne; baina, guztiarekin ere, Gurnemanzen bi narrazio luzeak (I. eta II. Ekitaldien lehen erdia baino gehiago hartzen dutenak) Wagner txarrena dira: jadanik ezagunak zaizkigun lehengo balentrien kontaera aspergarri bat, tentsio dramatikorik gabea. Guk proposatzen dugun *Parsifal* irakurketa *komunistak* bi narrazio horien errehabilitazio osoa dakar, operaren bi une funtsezkotzat hartuz. Aspergarriak izan daitezkeelako kontua sumatu egiten da Brechtek 1950eko hamarkada hasieran idatzitako poema labur baten lerroetan barrena. Poema Alemaniako Errepublika Demokratikoko langile izengabe bati zuzenduta dago, lanordu luzeen ondoren behartuta baitago tokiko alderdiko funtzionario batek emandako hitzaldi politiko aspergarri bat entzutera: “*Akiturik zaude lanaldi luzea kari / Hizlaria ari da bere burua errepikatzen / Hitzontzi baten hitzaldia, hizkera larriz / Ez ahaztu, nekatu horrek: / Egia dio*”. Hau da Gurnemanzen rola, zer eta egiaren ordezkaria izatea edo, zergatik ez, bozeramailea. Kasu jakin honetan, *aspergarri* predikatua bera da egiaren adierazle bat (are bektore bat), jolasen eta azaleko denbora-pasen txundimen liluragarria ez bezala (Badago, jakina, beste zentzu bat, Brechtek oso ondo zekienez: dialektika bera da barne-barnean komikoa).

Eta zer esan Koruaren azken deiaz “Erredimitu erredentorea!”, batzuek adiera anti-semitan irakurri zutena: “erredimitu/salbatu Kristo tradizio judutarraren arauetatik, semita izaeraz gabetu”? Hala eta guztiz ere, zergatik ez irakurri lerro hori zehazkiago, amaierako beste baieztapen *tautologikoaren* oihartzun modura: “Jo zuen lantzak bakarrik senda dezake zauria” (“*Die Wunde schliesst der Speer nur, der sie schlug*”)? Ez ote da hau prozesu iraultzaile ororen paradoxa giltzarria, haien bilakaeran indarrean dagoen bortizkeria gainditzeko bortizkeria beharrezkoa izateaz gain, iraultzak, Ordena Berri bat gisa sendotze aldera, bere seme-alabak irentsi behar dituela?

Wagner proto-faxista bat? Zergatik ez bertan behera utzi Wagnerren elementu proto-faxisten bilaketa hori, eta, horren ordez, bereganatze keinu bortitz batez, berrinskribatu *Parsifal* muturreko alderdi iraultzaileen tradizioan?

Sarri entzuten da, artelan bat ulertzearren haren testuinguru historikoa ezagutu beharra dagoela. Topiko historizista horren aurka, baten batek baieztatu beharko luke testuinguru historiko gehiegik lausotu egin dezakeela artelanarekiko harreman zuzena. *Parsifal*-i zuzen heltzeko, adibidez, batek ABSTRAKZIOA egin beharko luke horrelako huskeria historikoetatik, batek DESKONTESTUA-

LIZATU beharko luke obra, jatorriz tinko finkatua izan zen testuingurutik kanpo atera. Areago, artelana bera da, hain zuzen, testuinguru bat ematen duena, egoera historiko jakin bat zuzen ulertzeko gai izan gaitezen.

*Parsifal* bat, ez diharduena kanpoko kutsadurak (Kundry juduaren kopulazioa) mehatxaturiko odol garbidunen zirkulu elitista batez. Irudi horren aurrean bi zailtasun daude: lehenik, Klingsor bera, gaitzaren aztia eta Kundryren nagusia, Grialaren zaldun ohia da, barne gunekoa da; bigarren puntua, testua benetan hertsiki irakurtzen bada, ezin da saihestu honako ondorioa, alegia, gaitzaren egiazko iturburua, Grialaren komunitatea bidetik aterarazi zuen sakoneko desoreka, haren erdigunean bertan datzala; zorigaitzaren jatorrian Grialaz gozatzeko Titurelen gehiegizko obsesioa dago. Gaitzaren egiazko figura Titurel da, *père-jouisseur* lizun hori (agian aldera daitekeena Frank Herberten *Dun*-en azaltzen diren Espazio Kofradiako zizare erraldoi antzeko kideekin, gorputzak higuingarriki desitxuratuak dituztenak *espezia* gehiegi kontsumitzeagatik).

Horrek, bada, azpijana egiten dio ikuspegi anti-semitari, zeinaren arabera azken batean istilua beti baitator kanpoaldetik, organismo sozialaren oreka errotik aldarazten duen gorputz arrotz baten itxurapean (Brechten “Zer da banku batean lapurreta egitea, banku berri baten sortzearekin alderatuta?” galdera ezagunari dagokionez, bat tentatua dago esateko: “Zer da judu txiro batek eginiko urre ebaspena, Arioek –Wotan-ek– Legea indarrean jartzeko erabilitako funtsezko oinarrien bortizkeriarekin alderatuta?”): Wagnerrentzat, kanpotiko sarkina (Alberich) erabateko kontraesan/antagonismo immanente baten (Wotanena) bigarren mailako errepikapen, kanporatze bat baino ez da. Istiluak duen berezko estatus horren seinaleetako bat da Wagnerren operen amaiera handien porrota: hemen porrot formalak antagonismo sozialaren iraunkortasuna adierazten du.

* Slavoj Žižek-ek eta Imanol Galfarsorok lehenengoaren “Why is Wagner Worth Saving?” lanetik aterata eta egokitua (in Journal of Philosophy and Scripture, Vol. 2, Issue 1/Fall 2004, 18-30 orr.).

**SLAVOJ ŽIŽEK.** LJUBLJANA , 1949
Filosofoa

[ 52 ]



## **EL ÁNGEL EXTERMINADOR** | CARLOS BERLANGA

Hispavox, 1990

Carlos Berlangari buruz hitz egiten saiatzen naizenean, halako tristezia arin batek hartzen nau beti, minutu batzuk geroago esan edo idatziko dudanarekin objektiboegia izatea eragozten didana. Oraingo honetan ezin gutxiago izan eta berriz gertatu zait. Binilo jogailuan jarri berri dut *El ángel exterminador* eta ez zait malkorik erori, baina batek erortzeko mehatxu egin dit, nahiz eta hogei bat segundo baino ez diren pasatu diskoaren izenburua daraman kanta entzuten hasi naizenetik, Buñuelen film mitiko baten izena duen horixe. Ez dut ondo eramaten negar egitearena, ez zait batere gustatzen, baina sentsazio hori ohikoa egiten hasi da nigan Carlos Berlangaren kantu bat jartzen dudan aldiro, eta agian etsipen zantzu bat baino ez da, disko honen egileak ez baitu sekula gehiago diskorik grabatuko.

*El ángel exterminador* ez da Carlos Berlangaren diskorik onena. Zalantzarik gabe, *Indicios*-ek (Compadres, 1994) betetzen du leku hori; beraz, ez naiz inor engainatzen saiatuko, baina beti iruditu zait esanahi handiko lana, Carlosentzat ez baitzen erraza izan Dinarama utzi eta bakarkako bidea egiten hastea. Lehenago egin zuen musikatik urrundu behar zuen, baina ez kritikatua izateko bezainbeste; berarekin Alaskak eta Nacho Canutek osatzen zuten puzzlearen hiru piezetako bat joan zela erakutsi behar zuen, baina pieza garrantzitsuena zela aditzera eman gabe; *mainstream*-ari kontzesioren bat egin behar zion, baina gehiegi ere ez, agerikoegia ez izateko… Ziurrenik, zalantza horiek guztiak pasatuko ziren Carlosen burutik bakarkako lehen lan hori prestatzen ari zela; horrelako gauzengatik nabaritzen dugu disko honetan segurtasun gabezia txiki bat, egiten ari den guztia begi kezkagarri batek (edo agian askok) ikuskatua egongo balitz bezala.

Hamar kantu baino ez, bost alde bakoitzean; bi nabarmenduko ditut, Carlosen bakarkako ibilbideko nire bost kanta gogokoenen artean baitaude: *En el volcán* eta *Noches entre rejas*. Sentibera, isila, kuriositatea eragiten duena, dibertigarria, malenkoniatsua, grisa, atsegina, konfesionala, desinhibitua… horiexek dira Carlosen kantuetako alderdi zenbait, popa soilik hamar zertzeladatan irudikatzen laguntzen dioten ezaugarriak. Erritmo latindar askorekin apaintzen ditu, zenbait unetan oso markatuak diren teklatuekin, eta ustekabe atseginen batekin, esaterako, hitz izugarri onak edo beti dena bustitzen zuen umore berezia; izan ere, Carlos horixe zen batez ere, umorean aditua eta, frogatzeko, ez dago *No encuentro humor en el amor* izeneko diskoko laugarren kantua baino hoberik.

2010eko udaberrian Madrilen izan nintzen, Carlos Berlangaren lanari buruzko erakusketa monografiko batean (ez bakarrik lan musikalari buruzkoa), Pablo Sycetek atondutakoa; hantxe egiaztatu ahal izan nuen Carlosek bere lan guztian nahasten zituela perfekzio grina eta edertasunarekiko obsesioa, *El ángel exter-*

*minador* diskoan ere nabaritzen ditugun alderdi bi. Dena perfektua egiteko grina diskoko lehen segundotik nabaritzen dugu. Hortxe daude *El verano más triste* eta *En el volcán* kantetako uneak, aurreneko entzunaldian iltzatzen zaizkizun melodiekin, edo *paripé* edota *obstinación* bezalako hitzak erabiltzen dituzten letrak, pop kanta batean aurkitzea zailak direnak; izan ere, hitz perfektuak aurkitzearen kontu horretan ere lortu zuen Carlosek bikaintasuna.

Horrenbestez, *El ángel exterminador* diskoarekin geratzen naiz; *Sueños* izeneko azken kantura iritsi berri naiz, eta amets egiten dut beharbada *El ángel exterminador* entzuten dudan hurrengo aldian tristezia sentsazio hori ez dela berriz agertuko.

**IGNACIO MURO FERNÁNDEZ (SIGUESIGUEPOP).** FUENMAYOR (LA RIOJA), 1980
Blogaria
lanadadora.blogspot.com

**[ 53 ]**

## THIS IS OUR MUSIC | GALAXIE 500



Rough Trade, 1990

**MUSIKAREN ORDUA DA**
1991. urteko negua da, asteko eguna. Sestaoko Txokoa izeneko tabernan nabil lanean. Gaua da eta taberna ixtea tokatu zait. Eskobatzen dudan bitartean binilo baten kantua entzuten ari naiz.

"*Why's everybody look so nasty? What do I want with all these things?*" (Zergatik da jende guztia hain desatsegina? Zer nahi dut honekin guztiarekin?) Inoiz gogoratu al dituzu bizitzan oso gustuko izan dituzun diskoen kantuak?

Gezurra badirudi ere, norberarentzat garai batean erreferente izan ziren kantuak eta musika taldeak, urteek aurrera egin ahala konturatu izan gara ez zirela guk pentsatzen genuen bezain ederrak. Askotan, lotsatu gara garai batean entzundako doinuaz edo udako *edozein herriko jaietan* kantatutakoaz. Ni neu bai, behintzat!

Bestelako diskoekin, ordea, kontrakoa gertatzen da. Urteak joan eta urteak etorri, bizirik diraute. Berriro entzuten ditugunean, garai batean ematen ziguten plazera sorrarazten digute behin eta berriro. Harro sentitzen gara duela hainbeste denbora deskubritu izanaz.

Gorago aipatu dudan horrelako egoera batean konturatuko nintzen, ziur aski, Galaxie 500 taldeak egiten zituen kantuak bereziak zirela. Denbora pasa ondoren, taldearen zale bihurtu nintzen eta garaiko *walkman* horietako batean kasetetan grabatutako disko gehienak entzuten hasi nintzen. Batzuetan ohean,

gaueko epeltasunean erdi lo nengoela. Gogorapen gozoak ditut, gaztea nintzen, garai politak ziren, enamoratuta nenbilen eta bizipen horien guztien soinu banda Galaxie 500 taldearen kantuek irudikatzen zuten askotan. Duela 15 urte-edo, diskografia osoaren CD kutxa erosteko aukera izan nuen eta gaur egun oraindik plazer handiz entzuten dut.

60ko hamarkadaren erdian Galaxie 500 konpetentzia handiko autoa bilakatu zen, auto horietako gama oso bat Ingalaterrara eraman zuten, eta historian izandako *berlinetta* lasterketa hunkigarrienetariko bat aurkeztu zuten.

Horrelako zerbait gertatu zen Galaxie 500 taldearekin. Hirukote hau, Dean Wareham gitarra-jolea (Mercury Rev eta Luna taldeetako kidea ere), Naomi Yang (baxua) eta Damon Krukowski (bateria), apartekoa izan zen. Desagertu arte (1986-1991), hiru disko zoragarri kaleratu zituzten. *Today* (1988), *On Fire* (1989) eta *This Is Our Music* (1990). Oro har, *slowcore*, *dream pop* deritzan musika motarekin lotu bazituzten ere, *psychodelic rock* musika estilo barruan katalogatu zituzten. Musikaren erreferente bat izan ziren garai horretako ni bezalako gazte askorentzat.

Zein erraza den gaur egun Interneti esker edozein talderen inguruan nahi beste informazio biltzea, ezta? Egia esan, Javier Luky espainolaren garaian meritu handiagoa zeukan talde eta tendentzien inguruko informazioa lortzeak eta zabaltzeak. Agian horregatik garai horretan gaur egun baino musika hobea entzuten zen. Harrigarria da egun dauden baliabideekin taberna eta pub gehienetan entzuten den zaborra. Komeriak egin behar izaten genituen tabernetan pintxatzea atsegin genuenok. Esan bezala, gaur egun askoz errazagoa izanda, DJ/tabernarien Euskal Labela ez da apenas ikusten.

Oraingoan, egin behar izan dudan idazki honi esker, Galaxie 500 taldearen inguruan inoiz irakurri ez ditudan gorabeherak ezagutzeko aukera izan dut. Hala ere, lerro hauetan ezin izango ditut guztiak adierazi, jakina. Modu berean, galdera ugari etorri zaizkit burura. Zeintzuk aukera ditzaket, modu dibertigarri batez lerro hauetan idatzi ahal izateko? Bakarrik al gaude galaxia honetan? Nire anaia batek ume koxkorrak ginela mimo handiz gordetzen zituen 500 pezetako billeteek zerikusirik izango zuten Galaxie 500 taldea nire gustukoa zela erabaki nuenean?

Irakurri dudanaren arabera, talde honetako partaideak New Yorken ezagutu zuten elkar. Deam Wareham taldeko gitarrista izango zenak, 500 dolar zor zizkion oraindik bere taldekoa ez zen Naomi Yangi. Zorra kitatzeko hainbeste denbora eman zuenez, ordaintzera joan zenean, ea beste galaxia batetik zetorren galdetu zion Deami. Pasadizo horretatik hartu omen zuten taldearen izena.

Ez didazu sinistu, ezta? Ondo egin duzu. Badirudi taldearen izena parranda baten ostetik datorrela. Antza, parranda horretan. Deamen autoa hondatu zuten. Garai horretako Ford Galaxie 500 izenekoa. Beraiek egiten zuten musika estiloak aukera eman zion talde askori garai horretan *indie* zeritzan *rock independente* estilo hori kopiatzeko.

Euskal Herrian garai horretan, aipatutako *indie* musika estiloa gutxik entzuten genuen eta Bizkaiko Ezkerraldean askoz ere gutxiagok. Galaxie 500 taldea deskubritzea apartekoa izan zen niretzat. Esan bezala, tabernari egiten nuen lan garai horretan, eta askotan pintxatzen nuen oraingoan aukeratu dudan diskoa, *This Is Our Music*. Sarritan entzuteko eta gozatzeko aukera izan nuen, baita aurrerantzean nire musika estiloaren gustua definitzeko ere.

"*I went in back and took a Coke*" (Atzera bueltatu nintzen eta Koka-kola bat hartu nuen)
"*I stood in line and ate my Twinki*" (Ilaran jarri nintzen eta nire gozokia jan nuen)

**ALBERTO GARBAIO.** SESTAO, 1969
Musikazalea

**[ 54 ]**




## THE GOOD SON | NICK CAVE AND THE BAD SEEDS

Mute Records, 1990

Nola da posible zure diskoaren azalean piano baten aurrean, traje zuria jantzita eta balleteko dantzariz jantzitako neskatxez inguratuta aurkezten bazara txantxa edo eldarnio moduan hartua ez izatea? Are gehiago, nor da gai *The Ship Song* bezalako abesti eder bat hartu eta estetika dekadente berberaz baliatuz amesgaizto maltzur eta goxo baten moduko bideoklip bat grabatu eta oraindik eta ederrago eta mozkorgarriagoa egitea?

Nick Cave jauna, noski. Nor bestela? Gehiago esango nuke, garai jakin hartako (1989) Nick Cave bakarrik. Berlingo urte ilunak atzean utzi eta Sao Paulora etxez aldatu berria zen Nick Cave hura. Diskoaren barne argazkietan dotoreenetan dotoreen aurkeztuz Blixa Bargeld, Thomas Wydler, Kid Congo Powers, eta Mick Harvey *hazi gaiztoek* osatzen duten laukote magikoaren laguntza jaso zuena. Hori laukotea! Inspirazio eta senaz bere jakituria musikal guztia erabili behar izan zuten hemen, diskoak planteatzen duen nahasketa benetan baitzen arriskutsua: orkestra konponketa hunkigarriak eta aingeru pianoak alde batetik, eta Caveren lirika ekaiztsu eta irmoa bestetik. Baina goitik behera asmatu zutela iruditzen zait. Sortu zuten musikak, aurreko garaietan intsinuatu besterik egiten ez ziren erreferentziak jaso (Elvis Presleyren *In the Ghetto*-ren bertsioa edota Mick Harveyk Serge Gainsbourgengan beti azaldutako atxikipena) eta handituta bueltatzen baititu. Bere eraginpean, argitasun bare batek inguratzen ditu Nick Caveren ahotsa eta imajina. Sao Paulon aurkitutako maitasun berriaren eta droga desintoxikazio prozesu baten eraginez beharbada, ia espektro baten itxuran agertzen zaigu, beste dimentsio batetik kantu egiten digun izpiritua bailitzan, aingeru eta deabrua aldi berean. Nickek bere pertsonaia beti gogor landu du

baina nire ustez disko honetan bihurtzen da inoiz baino handiago eta eskuraezinago. Eta horrexegatik hain zuzen ere, produktu bakan eta errepikaezina (baita bere sortzaileentzat ere) izatearen kutsu horregatik edota punk makabroa, *bluesman* lizuna, oinazez beteriko *crooner*-a eta baladista erromantikoaren artean ematen den gurutzatze ezin hobe horregatik, disko hau lehen unetik nire arimaz jabetu zela onartu behar dut, nire adimena erabat lainotuz.

Objektiboa izatekotan, ez dakit disko hau onena denik esan daitekeen. Baliteke ez izatea. Baliteke pittin bat irregularra izatea, abesti batzuen distira indartsuak (*Ship Song, Wheeping Song*) beste kantu batzuk itsutzea. Baliteke ere, abesti handi horien aurrean beste edozein txikituta eta kikilduta sentitzea. Egia esan, argitasuna falta zait erabaki bat hartu ahal izateko. Entzuten dudan bakoitzean, maitemindu baten moduan nahastuta sentitzen bainaiz, *Foi Na Cruz*-eko koruaren lehen bertsoak niregana datozen bakoitzean, trantzean sartzen naiz eta zentzumenak galtzen ditudala sentitzen dut.

**ANTTON ITURBE.** URRETXU, 1971
Musika kazetaria
entzun.com

[ 55 ]

## **GOO** | SONIC YOUTH

DGC, 1990



**AMAIA BADIOLA.** GERNIKA, 1988
Argazkilaria
badiolaelgezabal.posterous.com

[ 56 ]

## **REVOLUTION GIRL STYLE NOW!** | BIKINI KILL



Autoekoizpena, 1991

Bikini Killen lehenengo diskoa 1991n grabatu zen, duela 20 urte baino gehiago, eta nik dakidala, ez zaio inolako omenaldirik egin, ezta halako bertsio diskorik ere. 20 urte jada, nerabea nintzenean, 20 urte lehenago argitaratutako Ramonesen diskoak entzuten nituenean bezala, zahar-zaharrak iruditzen zitzaizkidan, eta haiek legendako pertsonaiak.

Bizitza aldatu zidan disko honek, gure lagun Matik *Miau* zinean zioen moduan, "riot *grrrl*-ak bizitza aldatu zidan, feminismoak bizitza aldatu zidan". Kathleen Hanna oihuka eta Tobi Vail bateria astintzen entzutea sentimendu feministaren gauzatzea izan zen niretzat, bizitza osoan gordeta izan nuen bulkada bat, hitzetan adierazi beharrean erritmo, ahots-tonutan eta jarreran islatzen zena. Eta niretzat askapena izan zen. Bikini Kill lehenengoz entzun nuenerako jadanik ari nintzen jotzen, Runaways, The Raincoats, The Slits, edo Ramones zein Buzzcocks inspirazio iturri ziren niretzat, baita Stones, Beatles, Ronettes, Zombies eta Shirelles ere. 90eko Bilboko nerabe batentzat ez zen samurra talde batean jotzea. Noski, tresnak eta kontzertuak lortzeko aukera zegoen, areago, gaur egun baino underground taldeen kultura handiagoa zegoen, erakundeek bultzatuta, baina sozialki ez zen esparrurik onena emakume bat eszenatoki baten gainera igo zedin. Ez naiz orain hasiko bidean aurki zitezkeen oztopo guztiak zerrendatzen, baina laburbilduz, salbuespenak salbuespen, kondeszendentzia eta erridikulizazioa zuten ardatz, baina ez soilik gurekin pertsonalki, orokorrean emakume taldeak bigarren mailakotzat hartuak baitziren (zuzenean ez ikusiarena egiten ez zitzaienean), underground kulturan errotutako Bilbo hipermusikalizatuan.

Bikini Kill ezagutu behar den moduan ezagutu nuen, baten batek grabatu zidan kasete zinta baten bidez. Eman zidanean hitz hauek esan zizkidan: "neska hauek gogor-gogor egiten dute oihu, sabela ahotik aterako zaizu". Uste dut ezin dela hobeto definitu Kathleen Hannak disko honetan egiten duena, barru barrutik oihukatzen du, botaka egin beharrean. Lehenengo entzunalditik hunkitu eta harrapatu ninduen. Kutsu *naif*-eko *Carnival* abestiaren melodia edo *Double Dare Ya* ereserkiaren bikaintasun bat-batekoa edo *Liar* kantuaren oihukoruak. Eta jotzen genuenean gauza bera egin nahi genuen, ez soilik estetika musikalagatik, baizik eta nahi genuelako gure ingurukoek diskurtso hori entzun eta uler zezaten. *Scary feminity* estetika nahi genuen kopiatu, gu geu izateari uko egin gabe baina errespetua eta leku propioa eskatzen tematuta.

Ekintza politikoa da Bikini Killen lehenengo diskoa, hitz esplizituek jorratzen zutenagatik. Matxismoaren eta patriarkatuaren erabilerarik txarrenak biltzen dituen eszenan, bulkadez eta hormonez jositako eszenan, emakume izateagatik gertatzen zitzaien guztia salatzen zuten. *Pogo*-en bortizkeria, gurasokeria, sumisioa eta sexu-jazarpena. Baina politikoa izan zen neska askorentzat errefe-




rente bat sortze hutsa politikoa delako, eta iraganeko beste izen batzuk ahanzturaren eremutik, edo kasurik onenean anekdoten bildumetatik, askatu dituelako, hala nola, Wanda Jackson, Joan Jett edo Raincoats. Bikini Kill taldea, ordea, ez zetorren bakarrik. DIY etikan eta feminismoan hazitako beste hainbat taldek (adibidez Bratmobile, Heavens to Betsy, SK) eta inspirazio iturri ziren beste batzuek (Mecca Normal edota K Recordseko hainbat talde) eszena bat eta laguntza-sare bat osatu zuten, musika barneko genero-harremanak modu kritikoan kolokan jartzen hasiko zena. Bikini Killek Iraultza piztu zuen eta horixe izan zen gertatu zena, geroztik gauzak ez baitziren berriro berberak izango; nerabe askok eta askok jotzeari ekin zion eta musika-generoaren zuloa azaleratzen hasi zen, zulo gainetik jauzi egin baino lehen zuloa ikusarazi behar delako.

*Double Dare*-k abesti bakarrean laburtzen du diskoak askorentzat ekarri zuena, jabekuntza eta katarsia, termino propiotan eraikitako mugimendu oso baten ernamuina lortzeko bulkada eta konfiantza. *Riot grrrl* adierazpide eraginkor eta politikoa izan zen berriro bakarrik sentituko ez ziren askorentzat, eta ordura arte mikrofono bat hartzeko edo fanzine bat idazteko gauza izan ez zirenentzat. Baliteke disko honek, taldeak eta mugimenduak musikaren historian ezarri zuten mugarriari ezikusiarena egin nahi izatea, izan ere, punkari buruzko liburu gehienek oraindik ez dituzte jasotzen *riot grrrl*-aren zergatiak, eta oraindik ez diote lekurik edo sakontasunik ematen *underground* kulturan dagoen gene-

ro aurreiritzi ikaragarriei. Hala ere, irudipena dut emakume askoren bizitza libreagoa izaten hasi zela, laguntza eta arrazoiak aurkitzen hasi zirela guk geuk sortutako hizkuntza zerabilen korronte feminista ez-akademizista bat gurean ezustean sartu zenean.

**MARIA BILBAO.** BILBO, 1976
Ladyfest-eko antolatzailea

[ 57 ]

## **BIHAR ETA BERANDU** | JULIO KAGETA



GOR diskak, 1991

Heltzen da une bat musikak gure bizitzan garrantzi berezia lortzen duena; gutariko askori hala gertatu zitzaigun behintzat. Aurretik entzun, entzuten genuen musikarik, baina –esango nuke– hor zegoelako, ez atentziorik ematen geniolako. Momenturen batean, ordea, jakinda edo jakin gabe, erabaki genuen musikak ez zuela gure existentzietan leku periferikorik izango gehiagotan. Leku pribilegiatua emango genion, zentrala. *Rockeroak* ginen, *punkrockerrak*, *heavyak*.

Une hartatik aurrera musika ez zen gehiagotan *muzak* izango guretzat. *Haur* deitu ziguten eta orain *heldu* deitzen digute baina orduan ez ginen ez haur ez eta heldu ere. Eta musika ez zen oraindik intelektuala, estetikoa, teknikoa. Musika –rocka– sentsazio bat zen (gaur egunean ere batzuetan bada, zorionez) eta era erraz batean biltzen zituen zirrara, emozionalitatea, identitatea, sentimenduak eta jarrerak. Musika esperientzia integrala bilakatu zen.

Eraldaketa hori hainbat musika talderen eskutik egin genuen Ermuko gure lagun taldean. Baina niretzat eta arrebarentzat talde garrantzitsu bat bazen, hori Julio Kageta zen. Rock'n'rolla gure bizitzetara heldu aurretik, esamolde hutsa zen: "El último Julio Cagueta" esaten genuen lagunarteko lasterketetan; oso esaldi hedatua zen gure kontrastez betetako herri industrial itsusi eta eder hartan. Noski, nik laster erabaki nuen azkena heldu nahi nuela, eta apur bat baldar eta potolotxo izaki, ez zitzaidan asko kostatu. Julio Kageta ez zen jada lasterketako azkena, herriko rock talde garrantzitsuena zen, eta nork ez zuen hori izan nahi?

1991n grabatu eta kaleratu zuten *Bihar eta berandu* diskoa, herria "mekagüen el quinto centenario" zioten pintadez beteta zegoela. Aurretik bazituzten maketa batzuk, Banko de Esperma taldearekin erdizka kaleratua bat eta bakarka bestea. Baita SS-77, Pottoka eta Kiowak taldeekin LP bat ere. Baina guri horiek ez zitzaizkigun gerora arte iritsi. Tren ordutegien euskarako itzulpen eskasaren izenburua zuen disko hau (Mañana y tarde) kaleratu zutenean ordea, 11 urte genituen guk. Perfektua.

Baina ez gaitezen nostalgiarekin pasa. Orrialde hauetara disko hau eta ez besterik ekarri badut, ez da soilik guretzako izandako garrantziagatik, gaur egunean oraindik entzuten dudanean ileak tente eta gorputza dantzan jartzen dizkidalako baizik. Uste dut garai hartan musikak eman zuen onena biltzen saiatu zirela *Kagetak*, eta hein handi batean lortu zutela. Ez dago ezkutatzerik beraien pasio komun handiena The Clash zela, eta horren itzala oso nabaria da diskoko 10 kantuetan (haietako bat ingelesen *Stay Free* kantaren euskarazko moldaketa da), eta hau diodanean bertute handia dela uste dut. Strummer, Jones eta besteen kantuak hainbeste gustatzen zaizkigu (gure bizitzaren soinu banda dira, askoren ustetan) kantu borobilak direlako. Eta *Bihar eta berandu* diskoko kantuak ere halaxe dira, gaur egunean jada salto larregi egiten duen biniloa bezain borobilak. Hain dira borobilak non apustu egingo nukeen oraindik gaur disko hau buruz hasieratik amaierara kantatzeko gai izango nintzela, eta ni bezala beste asko.

Eta gaur egunean ere letra horiek kantatzeko gogotsu banaiz, hain zuzen ere oraindik ere zerbait esaten dutelako da. Salbuespenak salbuespen garai hartan ez zen –eta gaur ere ez da– erraza zer edo zer esaten zuen talderik topatzea. Euskararen egoeraz, hiesaz, emakumeen kontrako eguneroko indarkeriaz eta beste hainbat kontuz aritzen zitzaigun Julio Kageta, estilo eta dotorezia pare-gabez. Eta ez denez erraza gai politikoen inguruan aritzea panfleto kaxkarrak idatzi gabe, puntu bat gehiago emango diot horregatik disko honi.

Disko honekin nolabaiteko arrakasta izan zuen taldeak. *Mea kulpa* kantua irratian jarri zuten dezente, eta uda hartan plaza batzuk bete zituztela diote batzuek. 1993an *Mestizu* diskoa kaleratu zuten, eta ematen du inor gutxik ulertu zuela. Letrak beti bezain onak izanik, musika aldetik garai haietan entzuten zuten 90eko hamarkada hasierako rockari egin zioten leku eta, Euskal Herrian beste hainbat talde bezala (Danba, Beti Mugan edo Martxoak 31 datozkit burura), esango nuke azkarregi heldu zirela... Oraindik gogoan dut Ermuko parkean eman zuten azken kontzertua. Baina pelikula ez zen orduan amaitu: gerora Dantzut etorri zen, eta beranduago P.A.M. Eta bertan jarraitzen dute gaur ere Kageta batzuk, *Bihar eta berandu* grabatu zuteneko ilusio berberaz. Horrela entzuten ditugu oraindik geuk ere: belarriak, burua, hankak eta bihotza –batik bat bihotza– erabiliz.

**JOKIN AZPIAZU CARBALLO, OKERREKO.** ERMUA, 1981
Kultur eragilea
okerreko.net

## **JAIOTZE BASATIA** | SU TA GAR




IZ, 1991

Abuztuak 14,1990. Larrabetzuko Hori Bai Gaztetxera abiatu ginen, gidatzeko baimenak atera berri, ezin galdu genezakeen aurkezpen kontzertu batera; jendetza pilatu zen sarreran eta, halako batean, bidea zabaldu zitzaien gerrirainoko zapak zituzten Aitor Gorosabel, Xabier Bastida, Hasier Osoro eta Borxa Arrilagari. Su ta Gar heavy metal taldea jotzekoa zen. Itzela zen taldea zuzenean ikusteko genuen gogoa, arteragoko hilabeteetan eskuartean erabili genuen eta euren maketa, nork eta JM Sampedro *Sanpe*-k (πLT, Gu Ta Gutarrak) pasatutakoa. Azalean gitarra bat ageri zen suaz inguratua, gorri-beltzean. Harritu egin gintuen maketa hark hainbat arrazoirengatik; hasteko, izena. Su ta Gar. Ez dago euskaraz heavy metal talde bat izendatzeko hoberik. Estiloak transmititzen duen indarra eta berotasuna ondoen definitzen duena; horri lotuta, hizkuntzaz gabiltzalarik, ba euskaraz egiten zutela: ordura arte euskal rock joerek eta entzuleek, baztertuxe zuten estilo hori, eta mutil hauek harrotasunez aldarrikatzen zuten; eta bukatzeko, oso ondo egiten zutela. Klixe guztiak zekartzaten, estiloan eta gaietan: laster zetozen burura erreferentzia oso garbiak, hala nola, Iron Maiden, Metallica, Judas Priest, Helloween… 80ko hamarkadaren amaieran goi-goian zeudenak; gaiak ere atzerriko heavy taldeetan zerabiltzatenak ziren *Basamortuetako zalduna, Infernurako bidean*… Gaztelupeko Hotsak zigiluak CDan bildu zituen: *Su ta Gar (1987-1989)*. Kontzertu hartan maketako kantak ez eze, hurrengo lan luzean etorriko zirenak ere aurkeztu zizkiguten, eta Judas Priesten *Electric Eye* eta YJ Malmsteen aizkolariaren *Trilogy Op. Nº5* pieza instrumentala. 1991n etorri zen *Jaiotze basatia*, izen ezin aproposagoa oraingoan ere. Azala komiki estetikaduna zen, Manolo Gilena; bertan, lurpetik asfaltoa txikitu egiten duen gazte zapazto, larruzko txupaduna ageri da; amnistiaren aldeko pintada horman eta kale langileak. IZ diskoetxeak kaleratu zuen hiru formatutan: binilo, kasete eta CDan. Edizio digitalean *Haika mutil* kantuaren bertsioa ere sartu zuten, aurreratxoago grabatu zutena *Txerokee-Mikel Laboaren kantak* (Elkar,1990) diskoan. Su ta Gar taldearen lehenengo lan luze honek ondo erakusten zuen taldearen iturriak zeintzuk ziren, sasoi hartan heavy-power metal munduan nagusitu egin zirenak eta geurera ondo ekarriak: *Mari*, mito euskalduna bonbo bikoitz harrapaezinean, estilo berekoa ere *Etsi gabe*, gaia kartzela duena; gauari ere kantatu egiten zaio (zelan ez!) *Zure aurrean makurtzen naiz* abestian, baina erritmo pisutsuan. Gazte palestinarrak ere ageri dira *David eta Goliath* kantuan. Lanari izena ematen diona ale instrumentala dugu (ez oso ohiko kontua euskal rock musikan), entseatzeko gogoa kentzeko modukoa, *in crescendo* doana, erritmo aldaketaz josia, solo eta gitarra zorrotzak, ikaratzeko moduko abiada hartu arte, taldearen jotzeko indar, amorru eta birtuosismoaren erakusle. *Chapeau!* IZ estudioetan grabatu zuten Kaki Arkarazoren ardurapean. Su ta Gar: euskal heavy metalaren Alfa eta Omega.

**ISIDRO ELGEZABAL LARRAZABAL.** MUNGIA, 1972
*Artayorran baño, yantzan obetó!* irratsaioko esataria
bilbohiria.com

[ 59 ]



## **THE BEST OF THE WATERBOYS ’81-‘90**
THE WATERBOYS

Chrysalis Records, 1991

Azken urteotan modan dago 70 zein 80ko hamarkadan egin zen musika entzutea. Ulertzekoa da, garai aberatsak ziren eremu honetan eta hainbat lan interesante aurki genezake. Horietariko bat hemen aukeratu dudan Mike Scotten taldearena dugu. The Waterboysek ia hamarkada batean osoturiko abesti sorta hau.

Scott, taldearen *alma mater*-a, 1981ean Edinburgh jaioterritik Londonera jaitsi zenean hasi zen bandaren ibilbidea. Lehenik bakarka, baina laster Anthony Thistlethwaiteren saxoaren laguntzarekin Scottek konposaturiko abestiak entzuten hasi ziren. Disko honetan 1991. urtean saxo joleak taldea utzi arte sorturiko kantak batzen dira. Beraz, The Waterboysek 80ko hamarkadan egindako lanen aukeraketa dugu.

Banda lehen aldiz izen horrekin 1983an hasi bazen ere, eta hasierako lanek kritika onak jaso, ez zitzaien heldu publikoaren erantzuna hamarkadaren erdialdean multzo honetan ageri den *The Whole of the Moon* abestia atera zuten arte. Izan ere, diskoko laugarren abesti honek duen indarra ikaragarria da. Ezin alde egin haren eraginkortasunetik. Erritmoak lehen konpasetatik aurrera erakartzen gaitu, bateriaren lehen kolpetik. “*I picture a rainbow*” hasi eta berehala harrapatuta zaude. Musikaren bizitasuna hitzekin bat eginda. Ba al dago entzulerik erritmo hau entzun ondoren oraindik giharren bat ere mugitu barik gera dakiokeenik? Ziurrenik ez, bestela frogatzea besterik ez dago jakiteko. Horrela *Musika Handiaren* (*The Big Music*-aren) *jainkotiartasun scottiarra* sentituko duzu tronpeta sartzean, koro ahotsak lagundurik, eta Anthonyren saxo apartaren bermearekin.

Musikaz aparte, hitzak ere aipagarriak ditugu; poetikoak izenda daitezke nolabait bilduma honetako hainbat abestitakoak. Bat aukeratzearren, *Spirit#* abestia hartuko nuke. Gizakiak nekatu, amore ematen du, edo lau oinetan ibili, izpiritua ordea, hegaz doa. Gizakia irudikerietan erortzen da, izpiritua, aldiz, bada; gizakiak ametsak ditu, amarratuta/lotuta dago eta izpiritua bizirik eta aske dago. Alabaina, izpiritua dena gizakia ere bihur daiteke, aske alegia. Ez da lelo makala! Aurrean aipaturiko *The Whole of the Moon*-en ere eskailera igoz ilargirako goranzko bidaia horretan egin daitekeen bezala.

Folka eta rock‘n’rolla nahasten dituen banda honen kantuetan denetarik daukagu: bestelakotasunaren ereserkia kontsidera daitekeen *A Girl Called Johnny* musika alai eta bizi poz eragiletik Steve Wickhamen biolina sartu ondoren folkago bihurtutako soinura. Hari-instrumentu horren soinuak areagotzen du Irlandako tradizioan oinarrituriko musika zeltikoen kutsua. Esaterako, *Don’t*

*Bang the Drum*-eko hasierako Lorimeren tronpetaren melodiak Irlandatik urrun dauden lurraldeetara garamatza une batez, gero bertako musikara bueltatzeko, bidaiaren ondoren aberasturik. Eta bertako soinuekin bukatzen dugu, *Fisherman's Blues* zoragarritik aurrera irla berdearen musika gogoan. Taldearen logoa diren olatuen artean, modan egon ala ez, beti oroitzean.

**MARIASUN REQUERO ZABALA.** DEUSTU, 1965
Musikazalea

[ 60 ]

## GURE JARRERA | NEGU GORRIAK



Esan Ozenki, 1991

### 20 URTE JOAN DIRA

*Disko (zahar) bat oroitzapen kaxa bat da*

Kortatu taldearekin, besteak beste, hasi nintzen musika munduan murgiltzen. Institutu garaiak ziren haiek eta herriko taldea zen, gainera, 1988ra arte ibilbide arrakastatsua egin zuena. Adio esan zutenean askok ez genuen ulertu zergatia (gazteegia nintzen segur aski). Halere, dagoeneko konturatuta geunden Fermin ez zela geldirik egoteko jaio.

Trekurekin eta Iñigo anaiarekin batera sortutako Kortatu utzi ondoren, *Egin Irratia*-ren sortzaileetako bat izan zen Fermin. *Argia* aldizkarian eginiko *Ehun ginen* kolaborazioa aprobetxatu zuen Iñigorekin eta Kaki Arkarazorekin batera sortutako proiektuaren berri emateko.

2010ean publikatutako *Txinaurriak* diskoaren aurrekari izaniko *Txerokee* lanaren proiektuan hartu zuen parte Negu Gorriak taldeak 1990ean, Xabier Montoiak gonbidatu baitzituen Mikel Laboaren omenezko bilduma hartan parte hartzera. *Gaberako aterbea* izan zen aukeratutako abestia eta kantu horretatik hartu zuen izena.

Jendaurrean lehen aldiz Herrera de la Manchan azaldu ziren, 1990. urte amaieran, *Negu Gorriak* lehen diskoa plazaratu ondoren. *Gure jarrera* 1991ko apirilean publikatu zuten, Esan Ozenki sortu berriaren lehen erreferentzia. Jadanik hirukotea boskote bihurtua zen Mikel Abrego (bateria) eta Mikel Kazalis (baxua) musikariekin batera.

Eta 1991ko irailaren 7an ikusi nituen lehen aldiz zuzenean, Ezpeletan, taldeak Europan zehar bigarren lana ezagutzera emateko asmoz abiatutako biraren lehen kontzertu ofizialean (aurretik bi emanaldi ofizioso egin zituzten Bilboko gaztetxean eta Hernaniko La Bodegan). Ezpeletako egun hartan kartelean hiru banda aritu zirela nuen buruan, baina Dirty District paristarrak aritu zirela gon-



bidatu gisa dio *negugorriak.net* guneak. Diskoa udaberrian argitaratua zen eta jadanik ondo baino hobeto genituen bereganatuta kanta haiek guztiak. Dena den, Ezpeletara hurbildu ginen koadrilako lagunak txundituta geratu ginen aurrez aurre ikusi genuena ikusita. Ez dakit salto asko egin ote nuen, nire buruan lurrari itsatsita geratu nintzela baita gordetako irudi bakarra. Inoiz ikusi gabeak baikinen bertako talde baten antzeko ikuskizunik. Handia zen taldea, bai.

1992ko abenduan Parisera joan nintzen egun batzuk pasatzera eta Farenheit aretoan ikusi genuen Negu Gorriaken beste emanaldi bat. Hiesaz kutsatutako gaixoen aldeko elkarte batek antolatutako gaua zen. Bertan ikusi nuen *NGzaletasuna* anitza zela. Adibide gisa, nire begiekin ikusi bainuen, zapata txukunak, gona moñoñoa eta goardasol apainarekin Japoniatik *ex-profeso* Negu Gorriaken kontzertu hura ikustera etorritako *señorita* japoniarra.

Eta Japoniatik iritsi zen urte horretan bertan, 1992an, etxean ondo gordeta dudan *Gure jarrera* diskoaren edizioa, Irungo Bertso-Hop musika dendan erosia.

Bertso-Hop. 1989 urtearen bueltan zabaldutako proiektua. Ione, Jabiolo, Jitu eta Fermin ibili ziren urte haietan lanean, Vomito Social taldeko Victor abeslaria ahaztu gabe komikien atalean. Bertan ikusi nuen lehen aldiz Euskal Herrikoak zirela disko nazionalak eta bazela *alternatibo* izaterik Luis Marianoren kantuen bilduma bat salduz. Disko-denda hori oso garrantzitsua izan baitzen nire heziketa musikalean. Hori eta garai hartan musikari tartea eskaintzen zioten tabernak, noski.

*negugorriak.net* gunean dagoen informazioari esker gogoratu dut *Rockdelux* aldizkariak 1991ko urteko diskorik onena izendatu zuela *Gure jarrera*. Taldearen ibilbidea markatuko zuten ezaugarri guztiak jasotzen ditu: hainbat iturritatik edateko abilezia (*B.S.O.* abestian zioten bezala: "*sustraiak, rock, rap, reggae*"; hau da, Jon Maia bertsolaria eta Mano Negra nahastea edota Fugaziren *Song Number One* euskaratzea), hamaika kausarekin lotzeko gaitasuna (*Ez dezagun sal* eta porlanaren kontrako borroka; 80ko hamarkadako Ertamerikako *Bisitari iraultzailea*; Galindoren negozioak eta *Ustelkeria*, taldea auzitegitik eta hormaren kontra jarri zuen prozesu judiziala). Dena bandaren ohiko soinu gordinak iragazia.

Hogei urte pasa dira disko hau publikatu zenetik. Hamar urte jada taldeak agur esan zuenetik. Denbora ez da alferrik pasatzen, baina garaipenak geurea izaten jarraitu nahi badugu, esnatzeko garaia da: sinetsi, batu eta antolatu. Bakoitzak jar dezala esaldi hau nahi duen testuinguruan. Amen.

**MIKEL ITURRIA.** IRUN, 1968
Blogaria
eibar.org/blogak/iturri

[ 61 ]



## **FUGITIVOS DEL PARAÍSO** | DOCTOR DESEO

Oihuka, 1992

Ohatze baten gainean urakan baten indarra sentitzea. Horixe da niretzat Doctor Deseoren disko hori, ahizpak kasete batean grabatua zuena eta 12 urte nituela udalekuetara eramateko kendu niona. Begiraleei –ia denak bilbotarrak edo bizkaitarrak– bikain iruditzen zitzaien zinta hori eraman izana. Nik ez nuen Bilbo ezagutzen, Gabonetako PIN delakoan baino ez nintzen izana. Askatasuna sentitzen nuen. Urakan baten indarra bailitzan, urakan batek zugatik oihukatzen duenean duen indarra bailitzan. Eta begi goibeleko mutil eztia, aita erailtzera doana, eta ostiral gau magikoa, berarekin bakarrik azkenik atari batean. Param-pam-pan! Txindatak. Anarkiara bultzatzen zaituen musika. Gogoan dut udaleku haietan diskoteka batean banengo bezala egin nuela dantza, edo orain egiten dudan moduan. Inolako aurreiritzirik gabe bakalaoa dantzatzen mutil batekin, bera ere ganbaratik oso sano ez zegoena. Gainontzeko guztia espektatibak betetzeko tontakeriak izan ziren. Baina zentzurik gabeko dantza hartan zegoen, eta dago, potentzia guztia. Mutiko hura, Jonathan, ia ezagutu ez nuena, galtzeko gutxi eta irabazteko guztia duten horietakoa zen, argala eta hiperaktiboa, kaskamotza, berari eskaini nahi diot *Desde el centro del huracán* kantua. Kantu guztiak jarraian dantzatzen aritu ginelako, gure baitara bilduak, ito beharrean, erabat libreki gozatuz hamabi urte izatearen lanak bete izanaz, ligatzeaz eta abarrez. Geure onetik atera ginen eta bost axola izan zitzaigun dena. Estamentuak suntsitzen dituen musika, pozaren estatua ezartzen duena eta maitatzeko egiazko pasioa dakarrena, gogoak hala ematen dizulako.

**ELENA AIZKOA.** APODAKA, 1984
Artista plastikoa
sobrearteaitzkoa.blogspot.com

[ 62 ]

## **ZURIA BELTZEZ** | BAP!!



Basati diskak, 1992

Kafea eta galletakeko jendeak istorio honi buruz hitz egin zidanean, asko pentsatu gabe BAP!! taldearen *Zuria beltzez* diskoa aukeratu nuen, musikalki, asko markatu nauen diskoa izan delako, musikak pertsona bat gehien markatzen duen unean harrapatu ninduelako (15/20 urte), gertuko talde bat izan zelako eta hauek eta gauza gehiagorengatik, nire bizitzaren *jatorrizko soinu bandan* leku berezi bat duelako aukeratu nuen.

Gerora, pentsatzen jarrita, disko bat baino gehiago, niretzat musikalki garai bat markatu zuten diskoen artean dagoen bat dela konturatu naiz, 1990 eta 1994 urteen artean RRV-aren (*Rock Radikal Vasco*) amaiera izan zen niretzat; ordura arte BAP!! taldearen taulakideak izan zirenak (RIP, Cicatriz, Kortatu, Eskorbuto, Zarama eta abar) alde batera utzi, eta mugak urrutiratzen hasi nintzen garaia izan zen (Urban Dance Squad, Bad Brains, Fishbone, Fugazi...). Euskal Herrian ere, BAP!!-ekin batera hasi ziren erritmo berriak jorratzen zituzten taldeak aurrera ateratzen: Bizkar Hezurra, Orgasmic Toothpicks, Dut edota Negu Gorriak.

*Zuria beltzez* 1992. urtean argitaratu bazen ere, nik garai honi hasiera 1990. urtean eman nahi izan diot, ez nuelako pasatzen utzi nahi BAP!!-ek Mikel Laboaren omenez egindako *Txerokee* diskoan sartutako *Gogo eta gorputzaren zilbor hesteak* abestia, nire ustez abesti horrekin batera koka daitekeelako BAP!!-en soinu berriaren hasiera, musikalki trantsizio bat izango balitz bezala. Mikel bateria-joleak (Eneko abeslariaren anaia), Txanpiren ordez sartu zenak, grabatu zuen lehen abestia izan zelako eta BAP!!-en amaierara arte egongo zen formazioaren lehen pausoak zirelako. Honekin batera, Jomesen gitarrak eta Drakeren baxuen soinua teknikoagoa egin zen, bateriaren erritmo aldaketak oso nabariak ziren eta Enekok askoz ere erregistro gehiago sartu zizkion bere kantatzeko erari.

Abestien hitzetan ere, *...bidehuts eta etxehuts* diskoan bezala, badaude denuntziarako parada ugari, baina bigarren disko honetan gai intimoagoak ere nahasten dituzte (sexu harremanak, *Haur jolasak*; drogak, *Ni eta ni*; edota gaixotasunak *H.I.E.S.*) orain arte jorratutako gaiekin batera (euskara/hizkuntza *Celosamente gordea*; edota desinformazioa *Zuria beltzez*). Hitzak, hala ere, orain arteko diskoen antzera, ez dira denak pertsona berberak eginak, Enekok, Drakek, Xabi Ansak edota Hernaniko Euskal Herrian Euskarazen testu bat egokitua.

Baina esan bezala, lehenengo diskoarekiko aldaketa handiena musikan datza, erritmo aldaketa ugari, gitarra garbiagoak, Drakek baxuan duen teknika, ahotsaren melodiak edota bateriaren geldiune horiek. Ordura arte Euskal Herriko musikan oso ohikoak ez ziren gauza asko zituen disko honek. Urteen poderioz Andoaingo gaztetxetik pasa ziren talde kanpotarrak ikusiz ikasitakoak

dira BAP!!-eko taldekideak, eta ziurrenik hortxe gertatu zen punketik hardcorerainoko aldaketa hori.

BAP!! izan zen, euskaraz hardcorea egiten entzun genuen lehen taldea. Ameriketatik heldutako Bad Brains edota Minor Threat taldeen bideoetan ikusitako zuzeneko ikaragarri haien tamainako kontzertuak bizitzen erakutsi zigun taldea izan zela ere esan genezake. Asko zor diogu BAP!! taldeari eta *Zuria beltzez* diskoari, nire uste apalean.

**EGOITZ IRIZAR CABALLERO.** BEASAIN, 1975
Beasaingo gaztetxeko partaidea
flickr.com/egoirizar

**[ 63 ]**



## **SYSTÈME D** | LES RITA MITSOUKO

Virgin Records, 1993

80ko hamarkadan *chanson*-aren ondare musikal eta literarioa sintetizadoreka eguneratu zuten talde frantses ugarietako bat izan zen Les Rita Mitsouko. Baina beste batzuen aldean, haiek hobetzen joan ziren beren ibilbidearen amaierara arte, musika estilo guztiak talentu eta erraztasun berarekin berrasmatuz. New wave, elektronika, rap, funk, hip-hop, sanba, balada arina, berdin zitzaien: ezberdin egiten zituen ezin deskribatuzko zerbait izan zuten beti.

Catherine Ringer eta Frederic Chichin 1979an maitemindu ziren (*Wikipedia*-k horixe dio literalki), eta urtebete geroago sortu zuten Les Rita Mitsouko. 1985ean jo zuten goia *Marcia baila* kantarekin. Orain legendarioak diren beste single batzuk iritsi ziren gero, hala nola *Andy* (Andy Warholi omen eta barre egiten diote, aldi berean), *C´est comme ça* eta *Les histoires d´A*. Bideokliparen urrezko urteekin batera hasi ziren jotzen, eta genero hori ezin hobeto zetorkien beren konposizioen *kolorismoa* areagotzeko. Philippe Gautier eta Jean-Baptiste Mondino zuzendariekin lan egin zuten, baita J.L. Godard *erregearekin* ere; haren *Soigne ta droite* filmak *The No Comprendo* LParen grabazioko eszena dokumentalak jasotzen ditu, filmaren soinu-banda ere badena.

Argitaratu zutenean ez zituzten berrogei urte ere izango, baina kritikariek heldutasunaren diskoa deitu ohi dutena da Système D: bildutako kanta asko bitalistak diren arren, diskoak emaitzen balantzea izatearen itxura osoa du. Igoera sozialaren antsietateari buruzko satira dago, norbere belaunaldiarekiko kontugarbitzea, bikote-bizitzaren zoriontasun etsia, negozio-emakumearen fantasia erotikoak eta amodio-afera heldu eta desinhibitua –aldez aurretik porrot egingo duela jakin arren, berdin zaio–. Narratiba handiko taldea izan zen beti.

Diskoaren azala izugarri gustatzen zait. Egiptoko hieroglifiko baten modukoa da, baina 90eko urteetako bertsioan. Atzealdea zian kolorekoa da eta hitzak urre-koloreko letra apur bat fanzineroekin idatzita daude. Catherine eta Fredericek orekari eusten diote hitzetako baten gainean, eta batak besteari begiratzen diote besoak gurutzean eta hankak tolestuta. Festa gau baten ondoren surf eskola batean izena eman duten bi *dandy* dirudite. Zapatak bustitzea bost axola zaien *snob* batzuk.

*Système D* ez da beren albumik onena, gomendagarriena ere ez beren diskografian murgiltzeko. Baina zerbait berezia du, aldi berean oso Mitsouko eta oso *fin de siècle* dena, estilo ikonoklastaren esentzia ondo uztartzen duena. Handitu, aberastu eta desengainatu ziren *no future*-ko umeak, jarrera errukarri eta axolagabekoak, lotsagabe argitsuak izateari utzi gabe, kemen handiz.



Euren azken diskoa 2007an argitaratu zen, Frederic Chichin minbiziak hil baino zenbait hilabete lehenago. Pop frantsesa lutoan dago oraindik, baina Catherine Ringer, konpositorea, multi-instrumentista eta *frontgirl*-a, taulara itzuli zen 2011n *Ring'n roll* diskoarekin, bakarkako ibilbideko lehenengoa.

**MARIA PTQK.** BILBO, 1976
Blogaria
ptqkblogzine.blogspot.com

[ 64 ]



## BORREROAK BADITU MILAKA AURPEGI
NEGU GORRIAK

Esan Ozenki, 1993

Aspaldidanik, nire buruari galdera hori egiten diodan guztietan, erantzun berbera lortzen dut: *Borreroak baditu milaka aurpegi*.Disko gutxi dira, nire ustez, hau bezain mamitsuak, indartsuak eta sakonak. Disko gutxik hunkitu naute hainbeste eta hain sakonki hainbeste aldetatik.

Estudioko hirugarren disko hau plazaratu zutenerako, 1993ko apirilean, Negu Gorriak taldeak hainbat jauzi zituen emanak: arlo musikalean, oso berritzailea izan zen debut hartatik *Gure jarrera* (1991) bortitzera, hirukote izatetik boskotera. Herrera de la Manchako laino izoztutik eta zuzeneko testimonial hartatik, euskal talde batek inoiz egin duen birarik handiena gauzatuko zuen zuzeneko bikaineko talde trinkora; Europa erdia, Kuba eta, geroago, kontinente amerikarrerako lehenengo jauzia. Arlo exekutiboan, Oihukatik *egizu zeuk* kontzeptura eta Esan Ozenkiren esperientzia independentera (letra larriz). Arlo guztietan ari zen hazten taldea, eta disko hau, bere ibilbidearen erdigunea, hiru astetan grabatua eta astebetean nahastua, taldearen gailur musikala izan zen, nire ustez.

*Gure jarrerak* jada oso gogor hunkitu ninduen zentzu askotan, baina disko beltz bikoitz honekin errepidea erabat zabaltzen zen eta hainbat bidetan adarkatzen zen. Alde musikaletik zein emozionaletik disko gogorra da, luzea (70 minutu), rocka du oinarri nagusi (hitzaren zentzu zabalean), baina osagai askoz hornitua. Halaber, ihesbide gutxiko diskoa da. Estilistikoki oso aberatsa, taldeak bizitzen, miresten eta bereganatzen zituen esperientzia guztiak nahasten zituen bere *crossover*-ean, eremu original eta propio batera eramanez, eszena eta garai hartara. *Ikusi eta ikasi* kontzeptuaren ikasle aurreratuak ziren eta, aldi berean, irakasle umil eta zuhurrak.

Gogoan daukat sentitzen nuen lilura binilo bikoitzaren edizio dotoreak zekartzan Asisko Urmenetaren irudiei begira eta hitzak behin eta berriro irakurriz. Disko hau emozioen bilduma da, sentimendu ilunek zeharkatua, tristura, etsipena, larritasuna, heriotza, gorrotoa, mina, hutsunea edo itxarotea. Iris

zorroztuak mass mediei, rock and rollaren jukutriari, torturari, itxaropenari (tantaka, baina), gure bizimodu ereduari edo arrazakeriari ere erreparatzen die. Musika eta hitzen egileak taldekideak zein kanpokoak dira (Mikel Laboa, M-ak eta Delirium Tremensen bertsioak biltzen dituzte), baina hitzen ardura nagusia Fermin Muguruzak hartzen du bere gain, erreferentzia eta izen propioen zerrenda luzea utziz, beste hainbatetan bezala. Nire adinean, erabat arrotzak eta ezezagunak zitzaizkidan erreferentzia horiek, eta ezagutzea oso prozesu harrigarria izan zen. Hitzetatik ibiltzea altxor batera zihoan mapan ibiltzea bezalakoa zen.

Musikari dagokionez iturri agorrezina da: hardcorea, tenpo erdiak, haizeak, sanplerrak, abestiak janzten dituzten gitarren geruzak, baxuaren pultsua –oso presente–, erritmo-kutxa eta bateriaren arteko nahasketak, rapa, saltsa!...

Gogoan daukat, era berean, elkarrizketetako argazkietan janzten zituzten kamisetak: John Coltraneren *Blue Train*-ena, Mano Negra, Ice Cube, Mudhoney, John Lee Hooker eta, jakina, Public Enemy. Une haietan, musika-bidaia erraldoia izan zen, eragin izugarrikoa eta aurkikuntza atseginak ekarri zituena. Diskurtso musikal aurreratua zen hura, eta beste (gutxi) batzuekin herriko eszena berri baten lehenengo harria ezarri zuen. Hortxe zeuden, edo heltzen ari ziren, Ama Say, Dut, Kashbad, Lisabö, Anari edo Xabier Montoia. Ia kanta guztiak izan dira nire gogokoenak uneren batean. Noizean behin *Bi doberman beltz* zanpatzailean gelditu izan naiz, beste batzuetan *Hemen izango bazina*-ren edertasun arraroan, *Borreroak baditu milaka aurpegi*-ren kadentzian, *Kaixo*-ren bertsio erabatekoan, *Chaquito*-ren etxerako itzulerako festan dantzatzen, beste inoiz Bertolt Brechten bertsoak daramatzan *Hiltzeko era ugari dago* kantuan itota, edo *Erori* abestiko autoan txilinbueltaka.

Musikatik kanpokoak ere zentzu handia hartzen zuen hemen. Esan eta egiten zutenak erakarpen bitxia sortzen zidan, garai hartan ez bainuen ulertzen edo ez bainentorren guztiz bat beren jarrera batzuekin. Oso talde polemikoa zen batzuentzat. Uste dut niretzat oso txundigarria izan zela konturatzea hura ez zela edozein talde. 1993an Ferminek, OTH taldearen aipua eginez, honakoa zioen: “Rocka mundu zibilizatuaren azken abentura da. Eta horixe da bizitzen ari garena”. Eta pasadizo horiek oso iradokitzaileak ziren niretzat. Espainiako Herrera de la Manchako espetxearen harresiak gitarrez eta erritmo-kutxaz kolpatzen zituen taldea zen, 1991n blokeoa hautsi eta Kuban jo zuena, El Salvadorrera abiatu zena FMLNren lehenengo hauteskundeetan parte hartzera, Washington DCn Fugazi eta Chumbawambarekin batera jotzen zuena eta ustekabean Larrabetzuko gaztetxean. Intsumiso izateagatik bi kide epaitu behar zituztenean epaitegiaren aurrean kamioi batera igota kontzertua jotzen zuen taldea, eta Galindo beldurgarriari aurre egiten ziona.

Bai, musika talde bat baino gehiago zen hura, eta hau nire bizitzako diskoetako bat.

**AITOR SUAREZ.** BARAKALDO, 1976
Musikazalea
negugorriak.net

[ 65 ]




## THE BLACK RIDER | TOM WAITS

Virgin Records, 1993

### JULIO, TOM ETA AZAROA

Julio zen bere izena, filosofia zuen gustuko eta morroi hezigaitz eta bakarti ospea zuen. Nik gogoko nuen, berarekin askotan tratatu ez arren; ikasgela ezberdinetara gindoazen, eta bera Bidebietako institutura UBI ikastera baino ez zen etorri. Lantzean behin topo egiten genuen atsedenaldian edo *txoritokian* –horrelaxe deitzen genion ikasgelak zeuden ondoko eraikinari–, solastatzen ginen eta diskoak, liburuak eta bestelako kultur-artefaktuak trukatzen genituen. Haietatik, ordea, bakarrik dut gogoan 1994ko azaroko zorioneko egun batean utzi zidan zinta. Bere anaiarena omen zen eta astebetez baino ezin zidan utzi. “Tom Waits izeneko batena da. Ea gustukoa duzun” esan zidan Juliok irritxo arraroa eginez.

Etxera heldu, kasetea pletinan jarri A aldetik eta aho bete hortz utzi ninduen megafono baten bitartez orroaka aritzen zen tipoa entzuteak: “*Jaun-andreok, Harry’s Harbour Bizarrek harrotasun handiz aurkeztu nahi dizue gau honetan, pista nagusiaren karpapean... ’Gizaki bitxiak’. Bai horixe, hiru buruko umea ikusiko duzue, Hitlerren burmuina (...) Sealo ere ikusiko duzue, besoen ordez hegalak dituen foka-umea, Johnny Eck ikusiko duzue, gorputzik gabe jaio zen gizona, eta eskuekin ibiltzen dena...*” Tod Browningen *Freaks* filmari keinu egiten dion hasiera horrek erabat katigatu ninduen, baina baita gainontzeko 19 konposizioek ere, batzuk kakofoniatik hurbil daudenak, haien artean polka basatiak, balada dislokatuak eta infernuko kabaret moduko batetik aterata ziruditen melodiak. Nire gogokoenak ziren, eta oraindik dira, *November, The Briar and the Rose, I’ll Shoot the Moon, Lucky Day* eta, bereziki, *Russian Dance* instrumental liluragarria.

Jakina, geroago ezagutuko nituen izenburu horiek, *The Black Rider*-en CDa eskuratu nuenean, Julioren zintak ez baitzekarren inolako informaziorik. Orduan jakin nuen hainbeste hunkitu ninduen hura antzezlan baten soinu banda zela, 1991n Robert Wilsonek zuzendutako antzezlana, Tom Waitsen hitzak eta musika zeramatzana. Liburuxka William Burroughs deskribaezinarena da, XIX. mendeko ipuin aleman batean oinarrituta. Amorantearen maitasuna lortzeko deabruari arima saldu dion gizon baten –tituluko zaldizko beltzaren– istorio mefistotelikoa kontatzen du. Azkenean ustekabean bala magiko batez hilko du: Burroughsi berari gertatu zitzaionaren moduko zerbait, mozkorraldi batean emaztea buruan tiro batez hil baitzuen *Gilen Tell*-ena egiten jolasten ari zirela.

*Blue Valentine, Heartattack and Vine, Swordfishtrombones, Franks Wild Years* edota *Bone Machine* bezalako album apartak ezagutzera eraman ninduen zinta ilun hark. Ostean, unean unean eta zintzoki eskuratu izan ditut kaliforniarraren ondorengo diskoak (*Mule Variations, Blood Money, Alice, Real Gone* eta *Orphans*), eta liburu eta grabaketa piraten bilduma mardula osatu dut. Baina

*Black Rider* –melomanorik zailduenek ere Waitsen lanik onenen artean aipatu ohi ez duten diskoa– izan zen espartzuzko ahotsaren mendeko bihurtu ninduena, eta ahots horrek hamabost urte baino gehiago daramatza nire une zoriontsuenak eta garratzenak soinuz ilustratzen.

Beti nahi izan diot eskertu Juliori aurkikuntza hura, baina ez dugu hitz egin kasetea eman zidan egunetik: astebete geroago eskolara etortzeari utzi zion. Horregatik ezin izan nion aitortu maileguak iraun zuen zazpi egunetan zinta pletinan hainbeste aldiz jarri nuenez engantxatu egin zela eta ezingo zela berriro erabili.

1995etik aurrera, kazetaritza ikasketak hasi nituenean, haren bila hasi nintzen hainbat bidetatik, ikaskideei eta irakasleei galdetuz, baina ez zuten gogoratzen edo galdua zioten arrastoa. Ez orlan, ez institutuko urtekarietan, haren arrastorik ez, eta bera bizi omen zen auzoko kideek ere ez dute berririk. Lurrak irentsi izan balu bezala...

Juliorekin akordatu nintzen berriro 2008ko arratsalde hartan, egunkarira heldu zenean nire bizitza osoan ilusiorik handiena piztu izan didan albistea: “Tom Waitsek Kursaal aukeratu du Espainiako bere debut desiratua egiteko, uztailaren 12an”. Izoztuta geratu nintzen, ezin erreakzionaturik. Lasaitzen ahalegindu nintzen eta ordu eta erdi geroago, nire onera etorrita, informazioa idazteari ekin nion. Gogoan daukat hodei batean bezala eman nituela aurretiko asteak, baina halako batean Donostiako aretoan nengoen eserita, nire bizitzako kontzertuaz gozatzen. Ez dakit Waits berriro ikusteko aukera izango dudan, baina ondo dakit etorkizunean nekez biziko dudala antzeko ezer, bai zuzeneko musikak eragin zidan emozio amaiezinagatik, bai detaile arduragarri batengatik, oraindik ezin dudana zehaztu erreala izan zen ala urduritasunaren ondorio: Tom zaharrak *November* kantatzeari ekin zionean iruditu zitzaidan ez zela bera, baizik eta Julio laguntza eskatzen zuena bertso hauen bidez: “*Azaroak zuhaitz hil bati lotuta nauka; ohartarazi apirila aska nazan*”. Oraindik orain, irudi ilun hura datorkit burura *The Black Rider* entzuten dudan bakoitzean, denari hasiera eman zion diskoa.

**JUAN G. ANDRÉS.** DONOSTIA, 1977
Kazetaria eta argazkilaria
http://foteropanico.blogspot.com

## **4-TRACK DEMOS** | PJ HARVEY



Island, 1993

Kafea eta galletakekoek proiektu honetan parte hartzera gonbidatu nindutenean, automatikoki pentsatu nuen PJ Harveyri buruz idatzi nahi nuela. Kuriosoa da, orain ia entzuten ez dudan musika delako, nahiz eta, zalantzarik gabe, nirekin oso lotuta dagoen musika izan. PJ Harvey nire bizitzaren parte da eta nire artista gogokoenetako bat dela pentsatzen dut oraindik ere.

Bilbon ikasten nuenean ezagutu nuen PJ Harveyren musika, 1995. urte inguruan. Eta Iñaki izan zen, espiritu errebelde eta libreko jakintsu handi bat, Polly Jean aurreneko aldiz entzutera bultzatu ninduena[3].

Beharbada unibertsitateko lau urte haiek nire bizitzan izan zuten eraginagatik pentsatzen dut soinu hauek hainbeste markatu nautela. PJ Harveyren musikaren etengabeko oihartzunaren pean hazi, borrokatu, ikasi, maitatu, deskubritu eta batez ere sentitu nuen. Nire bizitza Bilbori eta PJri lotuta geratu zen betiko.

Erraza izan zen zein artistari buruz hitz egingo nuen erabakitzea, baina ez zen hain erraza izan zein diskotan zentratuko nintzen erabakitzea. Jende guztia gonbidatu nahiko nuke PJ Harveyren diskografia osoa entzutera eta bere soinu artegagarria deskubritzera: rock sofistikatua eta latza, disonantea eta preziosista, xuxurlaren eta uluaren artean mugitzen dena. Eta bere lan guztien artean hirugarrena gomendatu nahiko nuke bereziki: *4-Track Demos*. Disko horren hautaketa diskoak sortzen dizkidan emozio eta sentsazioen analisiaren emaitza da, zuekin partekatu nahiko nukeena. Onena da entzuten dudan bakoitzean ikusten dudala orduan transmititzen zizkidan indarrak, energiak eta amorruak bizirik dirautela, eta PJk giza arimaren sentimendu ezkutuak aztertzeko sortzen dituen pertsonaiek bere balioa erakusten jarraitzen dutela musikaren bitartez.

PJ Harvey ezagutzen ez dutenentzat: abeslari ingelesa da, landan hezitakoa, Dorseten. Dylan, Beatles eta, batez ere, Captain Beefhearten mireslea. 1992an argitaratu zuen *Dry* izeneko lehen diskoa Island Recordsekin. *Rid of Me* izan zen etxe berarekin kaleratu zuen bigarren diskoa, baina orduko hartan Steve Albinik ekoitzi zuen AEBetan (1993). Zenbait hilabete geroago, 1993an ere, Polly Jeanek autoekoitzitako lehen lana argitaratu zuen diskoetxe berean, *4-Track Demos* diskoa.

Jende askok pentsa dezake *4-Track Demos* diskokoak *Rid of Me*-n agertutako kantuen maketak baino ez direla, baina ez da hala. Izenak adierazten duen bezala, Polly Jeanek etxean 4 pistako batekin grabatutako maketen diskoa da,

[3] *Iña, ezingo dizut inoiz eskertu hainbeste une eder eta aholku bikain eman izana. Eskerrik asko urte hauetan guztietan irakatsi dizkidazun gauzengatik.*



bai, baina, besteak beste, harribitxi hauek ditu: *Reeling* (lehenago *50th Queenie* singlean azaldu zena) eta *Driving*, *Hardly Wait* (Kathryn Bigelowen 1995eko *Strange Days* filmaren eszena batean Juliette Lewisek bertsionatzen zuena), *Easy*, *M-Bike*, eta *Goodnight* berriak. Aurreko diskoan agertutako *Missed, Man-Size, Highway 61 Revisited, Dry* eta *Me-Jane* ordezkatzen zituzten kantu horiek. Gainerako zortzi kantuak PJ Harveyk *Rid of Me*-rako Albinirentzat eraikitako piezen maketak dira, eta horien artean daude: *Rid of Me, Legs, Snake, Hook, 50th Queenie, Ecstasy, Rub It 'Till Bleeds* eta *Yuri-G*, oraingoan soinu ikaragarri energiko eta irmoarekin, baina ez Albiniren bertsioan bezain urratzaile.

*4-Track Demos* entzutean, ikus dezakegu nola edo hala PJ Harveyk *Rid of Me*-ren ekoizleak inposatu zuen ukitu zaratatsua eta are latzari uko egiten diola, maketetako soinu gordin eta basatiagora itzultzeko (aurreko diskoa igaro eta sei hilabetera baino ez zirenak argitaratu). Batzuek diote Albini izan zela proiektu honen bultzatzailea, baina beste batzuen arabera PJ bera izan zen bere talentua erakutsi nahi izan zuena, *Rid of Me*-ren arrakasta eta balio guztia ekoizlearen lanari egozten zioten kritikak alde batera utzita.

*Rid of Me* lan zoragarria dela pentsatzen jarraitzen dut, baina *4-Track Demos* entzutea esperientzia ahaztezina iruditzen zait. Energia, indarra, errebeldia, soiltasuna, autogestioa, independentziaren bilaketa, printzipio eta idealen defentsa, etab. disko honetan inplizitu dauden balioak dira. Giza harremanen eta gauzen alde iluna aztertzen duen diskoa da, eta soinua, bikaina bada ere, deserosoegia gerta daiteke. Baina horrelaxe sortzen ditu kantari ingeles honek muturreko edertasuneko uneak, gure barruko paraje basati eta ezezagunetara eramaten gaituztenak. Disko honetako pertsonaiek *beat* belaunaldiko testuetatik ateratakoak dirudite (gizartean aitorrezin diren sentimenduz beteak), baina bluesik hutsena gogoratzen didan hizkuntza narkotikoa erabiltzen dute. Azken buruan, ia 20 urte geroago bizirik jarraitzen duen diskoa, ia zahartzen ez dena.

**CAROLINA MARTÍNEZ URBINA.** LOGROÑO, 1976
Musikazalea

**[ 67 ]**

## THE FIRST TINDERSTICKS ALBUM | TINDERSTICKS



This Way Up / Rough Trade, 1993

Gaur egun ia ezinezkoa da disko bat erostea egileari buruz apenas ezer jakin gabe, are gutxiago haren kanturik aurretik entzun gabe. Munduko talde *ezezagun* guztiak eskura ditugu Interneten, eta disko bat erostea erabakitzen dugunerako hamaika aldiz entzun dugu ordenagailuan. Geure buruari harridura, onean eta txarrean, eragiteko plazera –zer dela eta erosi dut hau?– desagertu da. Diskoak erostea ekintza aspergarri bilakatu da. Baina garai batean arriskatu beharra zegoen. Aldizkariek edota irratiko esatariek esaten zutenaz fidatu beharra zegoen. Meloiak bezala, ireki arte ezin jakin. Ona ateratzen zenean, satisfazioa bikoitza zen. Horregatik, xarma berezia dute niretzat garai batean katalogo bidez eskuratutako hainbat diskok. *Discoplay*-rekin hazitako eta hezitako belaunaldikoa naiz, baina une bat iritsi zen hura ez zela nahikoa, bilatzen nituen diskoak ez nituela bertan topatzen, eta Madrilgo Discos del Sur denda bihurtu zen nire eta ni bezalako beste askoren salbatzaile. Discos del Surren *dena* zegoelako. Nahi nituen diskoak eros nitzakeen bertan, inguruko dendetara inoiz iritsiko ziren kezkatu behar izan gabe. Gero Amazon heldu zen, eta akabo katalogoa, akabo Discos del Sur, eta akabo xarma.

Hamazazpi urte igaro dira postariak Tindersticksen lehen diskoa etxera ekarri zidanetik, eta oraindik gogoan dut biniloa jogailuan estreinakoz jarri nuenean eragin zizkidan zirrara, urduritasuna, zure inguruko beste inork ezagutzen ez duen zerbait deskubritu izanak sortzen duen harrotasun gordea, kalera atera eta mundu guztiari kontatzeko gogo bizia... 1994ko urriaren 15ean amaitu zen itxaronaldi luzea. Hilabete batzuk, urte erdi bat, tartean uda oso bat igaro zen aldizkari batean diskoari buruzko kritika kartsu bat irakurri nuenetik Discos del

Surren katalogoan aurkitu nuen arte. Ez dut prezioa gogoratzen baina ez zen merkea izango, izenburuaren alboan *import* jartzen zuelako. Kartoizko bildukia hautsi eta karpeta haztatzen hasi orduko sumatu nuen esku artean nuena handia zela. Suzanne Osborneren azalaren ederretik hasita: flamenko dantzari bat ageri da kobazuloa izan litekeen inguru ilun batean, bi besoekin soineko gorriaren parpailak zabaltzen ari den unean, eta atzean ijito familia bat du txaloka.

Ez ditut disko luzeak gustuko. 40 minututik gorakoari irizten diot luzea. Tindersticksen estreinaldia hogeita bi kantuk osatu zuten –CDan *Fruitless* falta da–. 77 minutu. Gehiegikeria bat edozein talderentzat, are gehiago hasiberri batentzat. Aurretik Asphalt Ribbonsen ibilitakoak ziren taldekideetako batzuk, Nothingham jaioterrian, baina apenas zeramaten urtebete elkarrekin kantuok grabatu zituztenean. Besterik grabatuko ez dutelakoan lehen diskoan material guztia sartzea askok egiten duten akatsa da, baina ez da kasua. Betelanik ez dago disko honetan, eta segundo bakoitza justifikatua dago. Kantuetatik bakar bat ere ez da baztergarria, eta aldiz, asko dira Tindersticksen onenetakoen artean daudenak: *Marbles, City Sickness, Raindrops, Whiskey & Water, Blood, Her, Jism, Patchwork, Paco de Ronaldo's*… 17 urte geroago oraindik harrigarriak egiten zaizkidan kantu anbiziosoak, ausartak, zaratatsuak, apasionatuak, pertsonalak, hunkigarriak, arriskuzaleak, erromantikoak, seduktoreak... Oraindik ez dut esan Tindersticksen diskorik onena dela?

*Brit-pop* taldeak (Blur, Oasis, Pulp, Suede…) ezagun egiten hasi ziren momentuan azaldu zen Tindersticks Londresko bihotzean, anomalia zoragarri bat bezala. Ez baitzen ohiko talde ingeles harroputz eta sasiglamourosoa. Galtzailearen estetika dekadente eta bazterrekoari lotzen zitzaion seikotea, Stuart Staples abeslariaren ahots sakon eta nagiak gidaturik. Logikoa zen beraz, lehen aipamenetan Nick Caverekin lotzea taldea –disko hau kaleratu ostean Bad Seedsen Europako biran lagundu zion australiarrari–, baina harenak baino agerikoagoak eta esanguratsuagoak diren eraginak daude Tindersticksen musikan: zinemako musika konpositoreena, John Barry eta *Midnight Cowboy*-rena esaterako (Claire Denis zuzendariaren hainbat filmetarako musika sortu du taldeak); Lee Hazlewood & Nancy Sinatra bikotearena (lehen singleetako batean *A Marriage Made in Heaven* grabatu zuten Isabella Rossellinirekin, eta geroztik ia disko guztietan, honetan izan ezik, egin dute kanturen bat emakumezkoren batekin), soul musikarena (urteak pasa ahala are pisu handiagoa hartu zuen) edota Townes van Zandt kantautorearena (garai hartan *Kathleen* jotzen zuten zuzenekoetan, baina Texaskoaren *St. John the Gambler* entzutea nahikoa da haren eraginaz jabetzeko).

Hain liluratuta nengoen, Discos del Surren hurrengo katalogo batean izenburu-rik gabeko Tindersticksen beste erreferentzia bat ikusi nuenean hura ere erosi egin nuen bitan pentsatu gabe. Paketea irekitzean, hura zaputza! Disko bera zen! (eskerrak gutxienez CDa eskatu nuela…). Diskoak katalogo bidez erostea-ren xarmak hori ere bazuen.

**JON ESKISABEL.** LASARTE, 1969
Kultur kazetaria

## [ 68 ]

## **UN SOPLO EN EL CORAZÓN** | FAMILY



Elefant, 1993

**BIHOZKIRRIA**

Umetako ipuinak bezala hasten da hau ere: lehengo batean, duela hamasei bat urte edo, mendira joan ginen Sutsu, Pui, Jota eta ni, pare bat gau pasatzera.

Izarraitz atzean bada Ixkiturri izeneko iturri bat, eta haren azpian, zuloan bezala, borda bat, garai batean ardiak gordetzeko erabilitakoa, gaur mendizaleen aterpe bilakatua, haurrek marrazten dituztenak bezalako teilatu batekin, beheko sua beste erosotasunik gabe, porlanezko zorua, leiho ñimiño batzuk, eserleku eta etzaleku izan daitekeen aulki luze bat hormari atxikia. Parajea bera ere ez da beste mundukoa, baina badu zerbait bere arruntean, gurutzez betetako gainak baino erakargarriagoa egiten duena. Borda luzea eta zapala da, alboan zuhaitz sendo eta luze bat nabarmentzen da, harrizko bordaren ondoan *plastidecor* marroiz eta berdez margotua ematen duena, porlanezko mahaia eta aulkiak ere baditu kanpoan, mendizaleak atseden hartu eta mokadu bat egitera esertzeko, eta putzu bat, gizakirik ageri ez denean basabereek ura edateko baliatzen dutena. Borda zokoan dago, zuloan bezala, iturrian behera hartu eta, zaldi gorrien putzurako joan-etorriek egindako bideari jarraituz, hamar minutu behar dira, garo artean barrena, bertara iristeko. Ez nuke esango paisaia ederra denik handik ikusten dena, baina gu ez ginen joan paisaiari so egotera. Zertara joan ginen? Egon lasai, oraintxe kontatuko dizut.

Gure ikasle pisuko sofa urdina zen. Lehen urtea nuen etxetik kanpo. Bost mutil ginen. Presio-eltzean prestatzen zuten pasta bikiek, eltzea jiratu eta pieza bakarra erortzen zen azpilera, bost zati egin, tomate potea hustu gainera, eta kito, horra afaria. Ez geneukan denborarik sukaldean galtzeko. Beste edozertan bai, ordea. Sutsuren bitartez ezagututako *Rockdelux* aldizkaria erosten nuen nik hilero, eta diskoen kritikak irakurtzen nituen, musikariei egindako elkarrizketak, zernahi, baina batzuetan, txori kantuak entzun beharrean ornitologia liburuak irakurtzen ari nintzela iruditzen zitzaidan, eta haserretu egiten nintzen neure buruarekin, baita aldizkariarekin ere, eta azkenean, neure buruari agindu nion ezetz, ez nuela gehiago erosiko, baina ezin izan nion tentazioari eutsi, eta aurreko urteko diskorik onenen zerrendak zetozen alea erosi nuen, han, Leioako kiosko galdu batean, euripean, haize hotza hezurretaraino sartzen zitzaidala.

Buruz ari naiz, baina oker ez banago, Portishead taldearen *Dummy* izan zen nazioarteko (munduko) diskorik onena, eta estatuko (Espainiako) disko onenaren saria, *ex-aequo*, Cancer Moon taldearen *Moor Room* lanarentzat eta Family taldearen *Un soplo en el corazón* diskoarentzat. Hirurak erosi nituen. Harrezkero, nire disko kuttunen artean daude. Batzuetan ondo etortzen dira ornitologia liburuak.

Txori kantuei asko erreparatu gabe egin genuen gorako bidea; Sutsu eta Pui gehiago, baina Jota eta ni ez ginen batere mendizaleak, amorrua ematen zigun euskaltasunaren eredu horrek, ez genuen ulertzen kristautasunaren gailurra nola maite zuen hainbeste jendek (tartean ezker abertzaleko asko eta askok): aldapan gora izerdia eta gibela bota ondoren dator gailurra, arnasa, bakea: sufritu gabe ez dago gozatzerik. Bidea da helburua eta gisako lerdokeriei barre egiten genien. Helikopteroan bertaraino eramango bagintuzte, gu pozak zoratzen. Baina ez gintuzten eraman, eta bide osoan “asko falta al da?” eginez lagunak aspertu ostean, azkenerako eurak gehiago nekatu ziren gu baino. Iritsi ginen halako batean, eta hotelik dotoreena bezain ederra iruditu zitzaigun harrizko borda. Hasia zen iluntzen.

Txotxak bildu genituen, adar lodiren bat edo beste bilatu, aurrekoek utzitako enbor zati bat zegoen beheko suaren ondoan. Udara gainean zen, baina ez zuen batere berorik egiten, hoztu egingo zuen gauean, goizean ihintza. Sua piztu genuen. Isilik zegoen mundua. Lau pila handi behar zituen irrati-kasetea zorrotik atera, Familyren diskoa eta La Buena Vidaren kantu batzuk (tartean *En bicicleta*) zeuzkan zinta hartu, eta suaren inguruan eseri ginen. Gaua gainera noiz eroriko geunden. Bertan geneuzkan izarrak eta limoiak.

Zilarrezko paperean bilduta eraman genuen, kartoi zati txiki bat zen, bizikleta baten irudia zeukan, lehen aldia zen, beldurtuta geunden, eta irrikak jota, elkarri begiratu genion hitzik egin gabe, laurdenaren erdia jan genuen bakoitzak. Jotak ez zuen jan, aingeru bat behar genuen, badaezpada. Begira-begira geneukan: kezka, maitasuna eta jakin mina erakusten zuten bere begi urdinek. Isilik geunden; ahosabaiaren kontra eduki behar zela esan ziguten. Bidaia hastera zihoan. Jotak *play* botoiari sakatu zion.

Gaua begietan lehertu zitzaigun, puztu egin ginen, izarrak sartu zitzaizkigun barrura, kabitu ezinda geunden, maitasuna ginen, dantzan egin genuen, barre etengabea ginen, baso ilunen gainetik egin genuen hegan, zaldi gorrien gainean ibili ginen, Portugaleko bihotzera egin genuen joan-etorria, musker bilakatu ginen, Familyren zinta jira eta bira ibili zen bitartean. Sutondoan hartu gintuen loak. Gau hura oroitzen dudan bakoitzean, bihozkirria egiten zait.

**XABIER GANTZARAIN.** AZKOITIA, 1975
Idazlea

[ 69 ]

## KING OF CALIFORNIA | DAVE ALVIN



Hightone, 1994

80ko hamarkadako uneren batean entzun nuen Dave Alvin lehenbiziko aldiz, The Blasters taldeko kide zela. Nabarmenak ziren bere gitarra eta bere hitzak, betiko moduan. Beste talde batzuetan ere ibilia zen, X eta Knitters kasu, baina oharkabean pasatu ziren; alabaina, kantuak idazteko duen gaitasun guztia Dave Alvin & the Guilty Men taldeko buru zela garatu zuen bereziki (baita the Guilty Womenekin ere, azken diskoetako batean). Suposatzen dut garai hartan harritu ninduela, beste zaletu asko bezala, The Blasters bezalako talde *rockanrollero* eta arrakastatsua utzi eta, gainera, abesteari ekin izanak, bere ahotsa ez baitzen abeslari handienen parekoa; are gutxiago bere anaia Philen ahotsarekin alderatuz gero. Bere hitzetan, *rocker* asko joaten ziren bere kontzertuetara lehengo *rockabilly* ganberroa (baina mamitsua) egiten jarraituko zuelakoan, baina txistu egiten zioten hartutako bide intimista (*americana*, *roots*, rocka, folka) entzutean. *Romeo´s Escape* (1987) eta *Blue Blvd'* (1991) dira bakarlari jaioberriaren lehenengo zezeldurak, baina *King of California* lanak (1994), akonpainamendu akustiko txiki batekin, erakusten du Dave musikagile eta gitarra-jotzaile bikaina izateaz gain, abeslari handia dela. *Blackjack David* (1998) da, honekin batera, gomendatuko nukeen beste diskoa.



*King of California* honetan erretzaile porrokatu baten ahotsa entzuten dugu (mentoidun tabakoa erretzen du, ahoan omen duen kiratsa mozorrotzeko), ahots gogortua eta laztua, kaleko pertsonen istorioak kontatzeko ezin hobea, amets amerikarraren edo maitasunaren bila joateko, samurtasuna, malenkonia, desengainua, bakardadea eta nekea nahastuz. Etxea eta maitalea utzi eta urre edo zilarraren bila Kaliforniarantz abiatzen denaren istorioa (*King of California*), su emailearena (*Barn Burning*), apartamentura itzultzean ume mexikarrak uztailaren 4a pozarren ospatzen ari direla ikusten duen langilearena, berarekin bizi den emakumea galdu izanagatik penatuta (*Fourth of July*). Egia esan, ia denak aritzen dira arima bakartuez, amodioez eta desamodioez (*Every Night About This Time, Goodbye Again, Bus Station, East Texas Blues, Little Honey, (I Won´t Be) Leaving, Border Radio*). Ama lurrari ere omenaldi egiten dio, Amerikako zenbait lurralderen basatasuna goraipatuz, Alaskarena, kasu, preso baten ahotik (*Mother Earth, Blue Wing*).

Beren artean oso abesti ezberdinak dira: George Jonesen *What Am I Worth* klasikoa, The Blasters taldeak oso bestelako modu batean eginak zituen kantuak (*Border Radio, Bus Station*), herrikoiak (*East Texas Blues*) edo lagunen eta konposatzaile handien kantuak (Tom Russellen *Blue Wing* edo Memphis Slimen *Mother Earth*). Harribitxi-sorta eder horri itxura berria eman zien Dave Alvinek, sinpleagoa dirudiena, baina kalitate handiz, Grez Leisz ekoizle, musikari eta slide gitarra-jotzailearen jenioari esker.

*Storyteller*-a da Dave Alvin, Woody Guthrieren irakaspenei asko zor dion ipuin kontalaria, baina baita Chuck Berry, Buck Owens, Ray Charles eta abarrei ere. Folk akustikoko diskoa da hau, baina *rocker* baten indarra du. Eta uler dezaket The Blastersen tankerako zerbaiten zain zeuden askoren atsekabea (neuk ere maite ditut *blasterrak*). Baina hau beste kontu bat da.

Bakarkako ibilbidearen hastapena ez zen samurra izan. *Romeo´s Escape* diskoak (1987) ez zuen arrakastarik izan merkatuan, eta Columbia Records diskoetxeak ez zion jaramon gehiagorik egin. Osasun arazoek pitin bat urrundu zuten zirkuitutik, baina Mojo Nixon eta Country Dick Montanarekin (Pleasure Barons) egin zuen birak salbatu egin zuen. 1989an Dwight Yoakamek ospetsu bihurtu zuen Daven kantu bat, Long White Cadillac, eta *royalty*-ekin bigarren diskoa atera ahal izan zuen Hightone zigiluarekin. Ordutik sustraidun rockean, folkean, *americana*-n eta soinu akustiko introspektiboagoetan murgildu izan da. Folk eta blues kantu herrikoien bilduma bati esker, *Public Domain: 'Songs From The Wild Land'* (2000), folk garaikideko albumik onenaren Grammya eskuratu zuen. Egun, Yep Rock zigiluarekin dago eta urte luzez Chris Gaffney lagun handiak, berriki hil denak, akordeoiaz lagundu zuen. Faseen banaketa bat irudikatzeko asmoz-edo, San Franciscoko Hardly Strictly Bluegrass Jaialdian banda bat egitea erabaki zuen, berarekin aritu izan ziren emakumeekin. Duela zenbait urte gau bat igaro nuen ardoa edaten Chris Gaffney eta Dave Alvinekin, kontzertu baten ostean, eta beren adiskidetasunari erreparatuta (bere izaeragatik ez omen da erraza Dave Alvinekin ondo konpontzea, *rocker* dibertigarri baina egozentrikoa baita, osti txarrekoa) ez nau harritzen beste egitasmo bat behar izanak.

Arestian aipatu dut estilo eklektikoa duela, baina uste dut introspekzioa dela bere ezaugarririk behinena, bere kantuen *leitmotiv*-a. Eta bi gauzok, eklektizismoa eta estilo pertsonala, ziren berak Ray Charlesengandik miresten zituenak. Berak kontatzen du 14 urte zituela, Ray Charles bera aurkitu zuela merkantzia-igogailu batean, garagardo-konpainia bateko konbentzioan jotzera zihoala. Ez zen ausartu ezer esatera, baina gustu handiz esango ziokeen miresten zuela nola apurtu zituen blues, gospel, country, jazz, r&b eta abarren arteko mugak. Ray Charlesek diskoak eginak zituen Betty Carter jazz musikariarekin, Guitar Slim bluesmanarekin, Aretha Franklin souleko erreginarekin, edo George Jones country *crooner*-arekin, abesteko estilo bereziari bizkarrik eman gabe, elizan zein tabernazuloetan oinarritua zegoena. Davek dio ez zela ausartu esatera kantuak idazteko erak Rayren filosofia eklektikoan zuela abiapuntu, eta harengan pentsatzea oso lagungarria zitzaiola jendeak bultzatzen zuenean estilo bakar batean aritzera.

Asko pozten naiz Dave hainbeste entzun izanaz Estatu Batuetara bizitzera joan aurretik. Eta gogoan daukat Cadillac zahar bat erosi eta lehenengo aldiz gidatu nuenean, ez Kalifornian (nire bizitzaren zati handiena igaro dudan lekua), baizik eta Ipar Karolinan, Dave Alvinen CD bat izan zela entzun nuen lehenengoa (ez dut gogoratzen zein, baina ziur aski *King of California* bera). Hopi indioekin egon naiz, greyhoundeko autobusen zain egon naiz... eta egia esatera, ezer ez zait berria iruditu. Baina rockzale gisa, Sam Cooke, Elvis, Ray Charles, Dwight Yoakam edo Tom Russellen soinuen bidez Amerikako hainbat errealitate sentitu izan nituen arren, Dave Alvinek iraganeko Amerikaren irudi erreflexiboa eman zidan, gaur egungo Amerikarekin nahastua. Eta ikuspegi hori berriro aurkitu nuen bere liburuan, bertan bizi izan naizen bederatzi urteetan nire alboan izan baitut.

**TERESA FERNANDEZ ULLOA.** BILBO, 1970
Gamuza Azul argitaletxeko editorea
csub.edu/~tfernandez_ulloa/GAMUZAAZUL/frameset.htm



## **SAY AMA** | AMA SAY

Esan Ozenki, 1994

**ZERBAIT EZBERDINA**

Laurogeita hamarreko hamarkadaren hondarrean deskubritu nuen Ama Say taldea. Ordurako taldea bananduta zegoen, eta beste behin ere, berandu iritsi nintzelako sentipen faltsua eduki nuen. Faltsua diot, zeren, besteren artean, orduan hasi bainintzen, halaber, Dut, Lisabö, Anari eta abar entzuten; esan nahi baita, betebetean jardunean zebiltzan puntako taldeak entzuten. Baina, ordukoan, Kortatu eta Negu Gorriak ziren gure arteko euskal talde entzunenak. Horren aldean, Ama Sayk, bai eta Beti Muganek ere, musika forma aski berriak ekartzen zizkidaten. Garai hartan hasi nintzen, gutxi gorabehera, Neil Young, Sonic Youth, Pavement, Pixies eta enparauak aditzen, eta jakina, Ama Sayk egiten zuena entzutea sekulako ziztada zen; hain gustukoak nituen nazioarteko talde horien oihartzunak entzun zitezkeen Ortuellakoen diskoetan, beren *euskanglish* berezi horrekin.

*Say ama* izan zen entzun nuen taldearen lehenengo diskoa. Donostiako Udal Liburutegira joaten nintzen diskoak mailegatzera eta handik hartu nuen. Hasieran pentsatu nuen eskuztatzearen ondorioz portada maiztua zegoela, baina gero ohartu nintzen berez zela halakoa. Musikarekin ere antzera gertatu zitzaidan. Izan ere, etxean CD grabagailua musika katean genuen atxikia eta bertatik grabatzen genituen diskoak; ez zen ohiko ordenagailuko CD grabatzaile horietako bat. Aitaren kontuak. Gauza bitxia, sekula ez baitut beste inon ikusi halako CD grabagailurik. Bada, grabagailu hartan, grabatu aurretik baxu eta altuak neurtu behar ziren, eta ondo neurtu ezean, grabatutako CDaren soinua distortsionatua entzuten zen. Hasieran, beraz, pentsatu nuen nire grabazio akats baten kariaz entzuten zela hain distortsionatuta, portada ere xahututa zegoela pentsatu nuen bezalaxe. Soinu honengatik, iruditzen zait disko ezin egokiagoa litzatekeela biniloan entzuteko. Eta galdera bat bururatzen zait: inor animatuko al litzateke, berriki Lisabök *Ezarian* diskoarekin egin bezala, *Say ama* biniloan berrargitaratzen? Har beza nahi duenak enbidoa.

Edonola ere, agian artean soinu berezi hartara ohituta ez nengoelako, diskoko kantu entzunena, orduan, *Mila kolore* zen, bere hastapeneko zimikatze aratz-aratzekin. Astindu txiki bat behar izanez gero, *Beti mugan* zen entzun beharreko abestia, hain zuzen, Hondarribiko taldearen omenezkoa. Nagore Santamariak, Beti Muganeko kideak, aipatu bi kantuetan –eta *Papillons noirs* izenekoan– abesten du, eta uste dut hori dela disko hau aukeratu izanaren arrazoietako bat, eta ez *Ikusi ditut umeak kalean ametsak akatzen*, hura ere bikaina den arren. Nagoreren ahotsa Ibon Bilbaorenarekin ezin hobeki lotzen da. Hala ere, diskoko abesti guztiak dira apartekoak. Entzun hasiera, esaterako, *Leolo*. Hortik aurrera nekez egingo duzu atzera, eta bata bestearen atzetik entzungo dituzu kantu guztiak. Ez du huts egiten diskoak.

Taldea deskubritu eta denbora gutxira, *Ttanttakun* irratian musika programa bat egiten hasi nintzen. Irratiak txosna bat jartzen zuen Porrontxo jaietan eta gogoan dut nola ipini nuen *Zerbait ezberdina* txanda egokitu zitzaidan egun batean. Tipo bat erotu beharrean igo zen barrara "*Give me something! Gime me something!*" oihuka. Zerbait ezberdina nahi zuen hark ere, agidanez.

**BEÑAT SARASOLA.** DONOSTIA, 1984
Idazlea

**[ 71 ]**

## REVOLUCIÓN CÓSMICA | RUIDO DE RABIA



Fobia / Duros Sentimientos, 1994

*"Luna, dame el calor*
*Sol, dame la sangre*
*Serpiente, dame el conocimiento*
*Que nazca el guerrero espiritual"*

Amerikako indioena dirudien kanta bati lotzen zaion bateria erredoble batek girotzen du diskoaren hasierako inbokazio moduko hau. Konturatu orduko, distortsio eta oihartzun korronte ekaitz baten barnean sartuak gara.

1994ko egunen batean disko honen kopia bat utzi zidaten, kasete batean grabatuta. Informazio bakarra zuen: taldearen izena pegatina batean idatzita; eta zelako izena.

Ume mokoa nintzenetik musikazale amorratua izan naiz eta nire bizitzako zenbait garai markatu duten diskoak ezagutu ditut. Honako hau disko berezi horietako bat da. Orduan oso gaztea nintzen, baina nire inguruko kointzidentzia batzuei esker, jadanik death metal estiloko musikan murgilduta nengoen. Nabarmenena nire anaia nagusia eta bere lagunen influentzia izan zen. Horietako lagun batek diskoak erosi, baina tokatarik ez zuenez, gure etxetik pasatzen zen ale horiek zintan grabatzeko. Berari esker, Terrorizer, Monstrosity, Audiorrea, Agathocles eta A.T.S. bezalako talde ezezagun asko ezagutu nituen, aurretik Cannibal Corpse edo Obituary moduko talde famatuak bakarrik entzunda nituela. Ruido de Rabiaren zinta berak pasatu zidan, noski.

Grabatutako zinta bat izanda, ez ninduen harritu soinu arraro eta zaratatsua izateak. Gerora, disko originala lortu nuenean, soinua benetan horrelakoa zela ohartu nintzen. Lagun batek komun baten barnean grabatua zirudiela esaten zidan barrezka; niri aldiz, soinuak kobazulo bat ekartzen zidan gogora. Antzeko lekuak azken finean, itxiak eta oihartzunetarako aproposak. Ahotsari, berez, halako oihartzun eta distortsio efektuak sartu zizkioten, baxuak ere distortsio





zaratatsu samarra zeukan. Grindcorea jotzeko oso modu originala zeukaten, beste estiloetako soinuekin uztartuta (Godflesh bezalako musika industriala, adibidez), baina oso era naturalean.

Honelako estiloa jorratzen duten taldeetan ohikoa da norbera kantariaren oihuen artean letra gutxiz jabetzea. Kasu honetan gaztelaniaz kantatzen zuten, noizbehinka esaldi batzuk ere ulertu ahal nituen, baina horiek, esanahiren bat argitu beharrean, misterioa handitu baino ez zuten egiten: "*revolución cósmica*", "*magia del tabú*" (neuk hasieran ulertzen nuen bezala), eta  abar. Ordura arte entzunda nituen antzeko estiloko taldeekin alderatuta oso ezberdina zen.

Edozein modutan ere, ez nuen diskoa behar bezala estimatu Bilboko Likiniano Topagunetik pasatu, diskoa erosi eta honekin batera zetorren liburuxkako letrak irakurri nituen arte. Hilabete batzuk lehenago *Pequeñas reliquias de un infanticida* euren aurreko maketa erosi nuen leku berean, eta horrelako diskoak originalean, hitzekin batera, edukitzea merezi zuela ikusi nuen. Talde hau entzun bai, baina euren letrak irakurtzeko aukerarik izan ez baduzu, ezin izan dituzu diskoak euren osotasunean gozatu, neuk behintzat horrela pentsatzen dut.

Soinua eta letrak bezala, diskoaren aurkezpena ere oso bitxia da. Karpetaren azala eta atzealdea, liburuxka, biniloaren galletak… guztiak benetan zainduta

daude. Eskuz egindako marrazkiak, Detritusen azaleko pintura, eta erreferentziaz jositako liburuxka, argazkigintzari zein Tao Te King liburuari, adibidez. Txikitatik marraztea gustatu izan zait eta Iron Maidenen portadekin flipatu izan dut. Agian horregatik beti eta, gaur egun, are gehiago, preziatu izan ditut, hau bezala, horrenbeste landuta dauden objektuak. Garai horretan diskoak argitaratzea oso zaila zela pentsatzen dut, izan ere, HHH, MG-15 edo L´Odi Social taldeek, besteak beste, atzerriko zigiluekin atera behar izan zituzten euren lehenengo lanak. Gaur egun aldiz, hori guztia erraztu da, baina aldi berean uste dut asko ez direla diskoez gehiegi arduratzen.

Bolada horretan nire inguruko arazo sozial eta politikoez (intsumisioa, ekologia, gazteentzako lokalak…) kezkatzen hasi nintzen eta ildo horretatik disko hau oso garrantzitsua izan zen. Aldi berean, beste musika talde interesgarri pilo bat ezagutzeko giltza izan zen. HHH, Rouse, Escombro (*Hijo del desecho!!*), Gutural, Orgon, Akauzazte, Censura, Vitu´s dance, Dickcheese, Ira et Decessus… disko honetako liburuxkan agertzen ziren, agurren atalean. Ordutik nire talderik kuttunenak, gehienak gipuzkoarrak, eta nire ustez, musika egin eta bizitzeko modu berezi baten adierazleak. Izan dudan influentzia handiena, haiengandik jaso dudana dela uste dut. Urteak pasa ahala, talde horietan ibilitako pertsonak ezagutzeko aukera izan dut eta poztasunez ikusi izan dut askok musika egiten jarraitzen dutela. Jarrera berarekin, umiltasunez, ilusioz eta inoren mesedetara makurtu barik. Aupa eurak!

**JON MARTIN.** LEIOA, 1980
Marrazkilaria

## [ 72 ]

## **UNDERRIBI** | BILDUMA (THE ILLUSIONS, ORGASMIC TOOTHPICKS, BETI MUGAN, DUT)



Basati Diskak, 1994

Zergatik *Underribi*? Aitzakia bat besterik ez, bizitzako garai jakin bat gogora ekartzeko. Gaur arratsaldean, azken trasteak ekarri ditut, orain bi urtera arte bizi izan nintzen etxe hartatik: diskoak, partiturak, liburu batzuk eta beste ezer baino txukunago gordetako kaseteak… ia denak grabatuak, noski. Hortxe dago *Underribi*.

Kaseteak berak zekarren kartoiaren gainean tamaina bereko folioa mozten nuen, koloreztatu (psikodelikoegi oraingo begietara) eta, beltzez beti, taldearen izen eta abestien izenburuak idazten nituen, asmatutako tipografia zaindu baino zainduagoz. Kasetera bihurtutako disko haietako asko nire gelakide zen Oskar Moralesek pasatzen zizkidan, 1994-1995 ikasturtean:

- UBI/COU, letretako gela (matematikekin batera, zoritxarrez ez zen *letras puras* taldea atera).

- 3 mutil gelan, azken ilaran, haietako 2 musikazale amorratuak, azken aurreko ilaran bi, Lorea eta ni.

-18 urte, dena lehen aldiz edo azken aldiz bizitzeko grina.

Ordura arte, anaiak eta ahizpak entzuten zutena entzuten nuen: Hertzainak., Kortatu eta Negu, Silvio, Bob Marley, Augustus Pablo, Enya (¿··***einnn)… Baina sasoi hartan, modu naturalean, nire kabuz hasi nintzen talde desberdinak deskubritzen, kanpokoak, baita hemengoak ere. Oso ondo gogoratzen dut, ezinbesteko eragina izan zuen *Bidegurutzean* irrati programak, Galder Izagirrek *Euskadi Gaztea*-n egiten zuenak, egunero 10etatik 11etara... klase orduetan komentatzen genituen aurreko gauean entzundakoak, astelehenetan bertako taldeak, eta asteko beste egunetan atzerrikoak... gozamena zen, egunero belarriak zabal-zabalik, bazka berriaren zain… gustuko zenbat talderen izenak entzun nituen lehen aldiz irratsaio hartan!

18 urte, nerabezaroa…19 urterekin bukatzen omen da, nirea ez behintzat, poliki nabil bizitza honetan nonbait. Nerabezaro, gaztaro berdin dio, jakina da, plastilina bezain moldagarriak ginela, malguak (orain ere bagara, gutxiago…), onerako eta txarrerako *esponjak* (gora Bob Esponja!). Talde berriak entzutean, geure nortasuna eraikiko bagenu bezala, gustuko musikariekin identifikatuta sentitzen ginen, geure buruak birsortuz, asmatuz. Harreman afektibo/emozionala eraiki genuen musikari eta fan guztiekin. Agian, lagun batek dioen moduan, *berezi* sentiarazten gintuen musika aukeratzen genuen, *euskal heavy* eta RRV-tik at.

Udarak Underribin pasatzeak izango du eraginik hango taldeak horrenbeste gustatzeko…musika inguruan biltzen ziren onyarbitarrek *estilo* jakin bat zuten, Eibarren inork ez zeraman halako janzkera eta, gauza horiek, tontakeriak izanda ere, markatu egiten dute. Nagore Santamaria bezalakoak izan nahi genuen, marradun soineko bat ere erosi nuen, berari argazki batean ikusi ondoren, kamisetak guk geuk egiten genituen, burua *gantxoz* josita Elasticako nesken moduan, bigarren eskuko dendetako alkandora *sixty*-ak…*mila kolorez* janzten ginen, orain berriz beltz ilunez (elegantea omen da eta meheago egiten gaitu).

Buelta gaitezen, bada, musikara. Ia derrigorrezkoa zait sasoi hartako disko batzuk aipatzea… zer sentitu nuen, zer pasatu zitzaidan burutik disko hauen lehen entzunaldietan? Pentsatze hutsarekin hunkitu egiten naiz:

- *Red Medicine* - Fugazi (1995) Talde handi hau ezagutu berri, lehen diskoak digeritu behar nituen, gehiegi niretzat.

- *Say ama* - Ama Say (1994) Pixies euskinglisean, zer gehiago eska niezaiokeen bizitzari? (Honen harira, ez zait ahaztuko Onyarbiko Hamlet taberna kanpoan zegoen Pixiesen pintada… taberna hartara sartzeko beste arrazoi bat).

- *Lehertzeko garaia* - BAP!! (1994) Ez zeukan zerikusirik nire anaiak entzuten zituen BAP!!-en diskoekin, zaila egin zitzaidan hasieran, baina entzun ahala… maisulana.

- *Dut* - Dut (1995) Eibarko polikiroldegian entzun nituen, Negurekin batera. Aitari eskatu nion diskoa, supermerkatuan erosi genuen, jogurtekin batera karritoan ibili zen, lehenengo entzunaldian bateriak txunditu egin ninduen, gogoan dut ahotsa baxu entzuten nuela ere, ez dakit zergatik. Nire talde kuttunena.

- *Bluff* - El Inquilino Comunista (1995) Melodia, distortsioa, gozo eta gazia, plazer bat osotasunean.

- *Dummy* - Portishead (1994) Uff! Hain zen desberdina, berria, konparaezina, bihotz-ziztada, gaurdaino.

- *Stranger Than Fiction* - Bad Religion (1995) *Hardcoretak* ginen, *old schoola*, bai, baina hardcore melodikoa ere bai! Zenbat aldiz Bad Religion eta Gorilla Biscuits Hilbehera tabernan! Jadanik bota egin dute eraikina.

- *Mellon Collie and the Infinite Sadness* - Smashing Pumpkins (1995) Aurreko diskoko *Disarm* abestiaz gogoratzen naiz. *Salto al vacío* (1995) filmean azaltzen zen, travelling bat, Ezkerraldeko irudiekin (oker ez banago), baliabide artistiko errazegia agian, efektista.

- *Circo luso* - El Niño Gusano (1995) Letra surrealista bezain ederrak, espainolez entzuten nuen talde bakanetako bat, aipatuko ditudan hauekin batera.

- *Está muy bien eso del cariño* - Kiko Veneno (1995) - Dantzatzea gustuko genuelako, eta inork baino hobeto nahasten zituelako flamenkoa eta rocka, eta letra xelebreak egiten zituelako eta *La bola de cristal*-en agertzen zelako. Maite dugu Kiko! Maite dugu Veneno! Maite dugu Pata negra!

- *Alta fidelidad* - Los Flechazos (1995) - Denongan dago mod bat.

Sasoi hartakoak dira Familyren *Un soplo en el corazón* eta Cancer Moonen *Moor Room*, gerora ezagutu ditudanak.

Ondo egon da gogoratzearen ariketa, neuk ere "*gauza erabiliak ditut gehien maite…eta hitzak ere, baita hitzak ere, askok esandako horiek": "konturatu momentu hau jada pasatu dela", "el hoy no es mañana es ahora, putos!", "aujourd´hui maintenant*".

"*…poztekoa da: aurrera baino ezin du egin batek*".

**MAITE ARROITAJAUREGI.** EIBAR, 1977
Musikazalea

[ 73 ]




## **REFRIED ECTOPLASM (SWITCHED ON VOLUME 2)** | STEREOLAB

Duophonik eta Drag City, 1995

*"The immutable system engenders rot*
*The world is exciting*
*Is the triumph as the new nation*
*But the tensions have to be creative with some time*
*I don't care if the fascists have to win*
*I don't care democracy's being fucked*
*I don't care socialism's full of sin*
*The immutable system is so corrupt*
*We got to keep the lift, hope, and struggle*
*Where is the lift, the hope, and the struggle*
*Give me the strength, the lift, hope, and struggle."*

**STEREOLAB OROIMENAREN EREMUAN AMAIERA IREKIAZ**
Esaldiok ezin zuzenagoak izan. Stereolaben *Jenny Ondioline* singlean azaltzen dira, baita *Transient Random-Noise Bursts with Announcements* (Duophonic/ Elektra, 1993) izeneko LP bikoitzaren bigarren diskoa zabaltzen duen kantuan ere: minimalismo krautrockaren burrunba eta behin eta berriz errepikaturiko oszilazioa ahots goxo eta aldagaitz baten pean. Kantu hori da, duela ia hogei urte Stereolab *aurkitu* nuenetik, nirekin luzeen jarraitu dutenetako bat; gaur bertan ere berriro entzun eta neure barrena inarrosten segitzen du. Hiru aldiz trukatu eta eskuratu nuen diskoa, oraindik gogoan dut, *Golden Ball*-en bilbaturiko jauzi txikia kantuan bertan txertaturiko intentzio bat dela jakin gabe.

Musika, istorioak eta pertsonak jasoko zituen liburu (kolektibo) baterako album baten inguruan lerro batzuk idazteko gonbitea jaso nuenean, gehien erakarri ninduena ikuspuntua izan zen: disko bat hizpide hartzea beste topaketa batez mintzatzeko, harekiko harremanaz eta haren entzunaldietan ibilitako bide pertsonalaz, alegia. Horrek ia esplikatuko luke zergatik hautatu dudan, diskoaren estiloa, jarrera eta kantuak alde batera utzi gabe. Lehenago hamaika klasiko, mito eta aitzindari bururatu zitzaizkidan, baina argi zegoen Stereolab izango zela hautatua, kronika objektibo batetik urruntzea saihestezina izango zaidan –beste arrazoi bat, agian, hemen txoko bat izateko– eta, 90etakoa izan arren, bi hamarkada geroago bazter utzi ezinik segitzen dudan talde hura.

Mintzagai dudan diskoa ez da hertsiki estudio-album bat, konpilazio bat baizik; bildumak talde baten soinuan sartzen hasteko oso abiapuntu kartsua izaten ez diren arren –bakan batzuek baino ez dute merezi–, single eta neurri txikiko bilduma honek disko erabat organiko, ilun eta nortasunez betea armatzen du. Tindersticks taldeko Stuart A. Staplesek ondo esan zuenez, "album bat arte modu bat da eta nola hasi, nola jarraitu eta nola amaitzen



den harremanean izan behar dute. Ez da kantu bilduma hutsa". Bada, horixe sumatzen da *Refried Ectoplasm (Switched On Volume 2)* (Duophonic, 1995) bilduma kilikagarrian.

1996an, *The Wire* aldizkarirako Tim Ganeri egindako elkarrizketa batean, musikari eta konpositoreak, Stereolaben lanean erabili ohi duten prozesu sortzaileaz hizketan ari zela, esaldi hau bota zuen: "Izugarri maite ditut kontradikzioak musikan, zerbait kontradiktorioa izan behar lukeela uste dut. (...) Musikak hitzen bidez transmititu ezin den zerbait transmititu beharko lukeela uste dut".

Hamabost urte geroago, idazten ari den honek berdin pentsatzen du soinu hark bakar eta deskriba ezinetik zerbait duela eta egun ere harritu barik oraindik hunkitzen gaituela: minimalismoaren barrokoa, *low-fi* soinua *high-tech* labirintoen lexikoaren azpian. Elebitasunaren eklektikoak. Jolasaren eta erresonantzia batean kodeturiko berbazko paradoxaren maisuak. *Justaposizioaren* egileak dira (kontua *soinuak nahasten joatean* datza, *nire ideiak ordenatzen joateko eta konposatzen hasteko*), hain konplexua den zerbait zeharo eder eta esferikoa bihurtzearren.

Menturatuz eta musikari atipiko horren iruzkina profitatuz, Laetitia Sadier bere lagunarekin batera gidatzen duen taldearen disko bat hautatu dut, eraikitzen duten musikaz eta, beraz, musika horrek dakarrenaz mintzatzeko, agian, hausnarrean egiteko, eta argudio hariaz baliatuko naiz aitzakia gisa garai bateko denbora bitartean sartzeko, giltzarri autobiografikoan, erreferente ilunago batetik, eta beren beste edozein estudio album baino gutxiago aipatutakoa; hau da, singleen eta B aldeen diskoa, haien hasierako lau urteetako bitxikeriak bil-

tzen dituena: *Refried Ectoplasm (Switched On Volume 2)*, Erresuma Batuan Duophonicek eta Estatu Batuetan Drag Cityk editatua eta 1995ean argitaratua.

Hasierako agur moduan, irrati-distortsio baten osteko *Harmonium*-en kolpe latzak herrestan zaramatza kiribil kraut baterantz, *velvetarra* bainoago Neu!; laban horizontalak bezalako gitarrek mozten dute oinarria, eta atzean Laetitia Sadierren ahots zolia ageri da, dentsitate itzelezko disonantzia batekiko kontrapuntua. Amaigabe errepikaturiko akordeek Steve Reich dakarte gogora, bukaera antzematen denean ere sekula finitzen ez den kantu hipnotiko batean.

Bigarren kantuak egiten duen norabide aldaketa bezain indartsua da diskoa horrela abiatzea. *Lo Boob Oscillator* izenekoan ertzik gabeko jaitsiera batean amiltzen da Laetitiaren ahots leundu eta biluzia, Farfisas lagun. Dei baten moduko bi nota dira harrapatzen nautenak, toki horretan, estreinakoz kantu hau ustekabean entzun nuen kafetegi berean, sartu orduko.

Errealitatea orain topaketa haren fikzio bilakatu balitz bezala; nik eszena hura, lau urte geroago Stephen Frearsek *High Fidelity* (2000) bere filmean birsortuko zuena, antzeztu izan banu bezala, Caroline kazetari musikalak Rob Gordonen (John Cusack) Championship Vinyl disko dendan sartu eta galdetzen dionean:

– Barkatu, Stereolab al da hau?
– Bai, hala da –erantzuten du.
– Hau ez nuen ezagutzen. Izugarrizko soinua du.

Niri tabernako zerbitzari dotore eta melomanoak azaldu zidan disko bitxia zela, tema bat single, B alde eta kantu editatu gabeek osatu bilduma baten barruan, ez baita estudio album bat, ezta usadiozko konpilazio bat ere.

Berdin zuen, hara aurrenekoa iritsi nintzen narratzaile bezala oholtzara igo eta ipuin bat kontatzeko, baina, hura baino lehen eta sartu bezain laster, musikak gainezka bete zuen aretoa, eta inoiz ez bukatzea desiratu nuen *space age pop* kutsuko kapsula batean inguratu ninduen (une honetantxe, hitzok irakurtzen ari zaren bitartean, entzuten ari zarela imajinatzen dut). Txalo eta koloreen kitsch estiloko soinuak bultza egiten zidan zuhaitz eta zelaien, maitale eta igerilekuen paisaia baterantz: denbora tarte bat zorionaldi baten erdian. Lipar asmatu batek sorturiko bitartea. Pasarte bat zen, errealitate bihurtu zena ikuskizunik permititu eta desiratuenaren barruan. Oroimena barnebiltzen duen soinuzko argi infinitua, baterian hautsia. Eta nire bizitzako garai bateko une zoragarri eta hedonista baten historia horrek oihartzun egiten du diskoko pieza hark lokalean bezala: zirku girokoa eta zorioneko gailur bat bezala, ziurgabetasun ilun, are dinamiko eta saihestezin baten erdian.

Ordura arte inoiz entzungabea nuen *Lo Boob Oscillator* (aka *Sub Pop* –singlea diskoetxe horretan editatu zen eta haiek izengoiti hori jartzen diote–), eta halere melodia hori beti nire oroimenean egona zela sentitu nuen, nire gurasoen *exotic* edo *lounge* estiloko disko zahar haietakoak bezala. Ez da lehen-mina, bihotzari eragindako zirrara muturreko eta zuzena da, hain klasiko (*vintage*) bihurtu diren

Moog, Farfisas eta Vox sintetizadore horiek sortutakoa bezalakoa. Soinuaren berehalako saturazioa, aldian emaniko hiru notetarik harantzago.

Eta horrela eskuratu nituen CD *arraro* hori eta are *arraroagoa* den anbar-koloreko LP bikoitzaren edizio mugatua ere; orduan beste kantu batzuk, argitaragabeak edo aurkitzen zailak, deskubritu nituen, hala nola, *Tone Burst (Country)* (aka *Captain Beefheart*), niretzat, beste fabula sekretu bat, *astotxo kaleidoskopikoen* entzumenerako: inoiz argitaratu ez zen split baterako proiektua Spectrumekin.

Edota *Crumb Duck* (Clawfist, 1993), Stereolaben EP xelebrea Nurse with Wound industrialekin, jada *Jenny Ondioline* gogora zekarrena. Izan ere, *Exploding Head Movie* da abesti haren zatirik onenaren erremix bat (lehenengo aldearen bukaera albumaren jatorrizko bertsio luzean): berriz ere testu honen idazpuruan azaltzen den ahapaldi txiki itzelera bueltan!

Eta *Animal or Vegetable (A Wonderful Wooden Reason)*, konpilazioan C alde osoa hartzen duena, izugarrizko esperimentua da alderantzizko ahotsekin eta okitu arteko gitarra-geruza eta geruzekin distortsioan. Laetitiaren xuxurla, soinu-gangek herrestan eramana, geratu egiten da malgukien eta bateriaren errepika batean, puskatu, berriz altxatu eta tutu instrumental batean injektatzen da, argi atomo bat bezala jaurtia.

Diskoaren azkeneko tramu liluragarria, D aldea, zabaltzeko eta John Cage abangoardiako konpositore ospetsuarenganako ordainetan, *John Cage Bubblegum* iristen da. *John*-en ondoren *Sadistic* dator, ezezagun eta ezinbestekoa –bilduma honegatik izan ez balitz sekula edango ez genuena!–, pilula supersonikoa, beti atzera eramango nauena gure madrildar Sala Maravillas kutuneko dantza haien hedonismo *indie* eta malasañero gautarreraino. Hori bera dakarkit gogora *French Disko*-k, bizitasunez betea, txantxa moduko kontsonante-trukea eta guzti.

*Refried Ectoplasm (Switched On Volume 2)*, edo besterik gabe *Refried Ectoplasm*, 1992ko *Switch On (Too Pure)* lehen bildumaren segidakoa da. Stereolaben diskoen eta kantuen izenburuak inoiz ez dira halabeharrezkoak, ezta haien portadak ere. Poema bat, musika tresna bat, peli bat, artista bat, musikari bat edo emakume ekintzaile bat izan, hitz joko bakoitzean irakurketa edo omenaldi bat dago. 1968ko *Switched On Bach* da Wendy Carlosen debut-albuma, musika elektronikoan sintetizadoreak erabiltzen aitzindaria eta mintzatzen ari garen diskoaren izena inspiratu zuena.

Azalak pertsonaia arraro hori erakusten du berriro. Irudi bat, *The Deadly Finger*, destatu, agiraka eta tiro egiten duen hatz hilgarria. Ezizenez *Cliff* esaten zioten eta haien lehen diskoen portadetan agertzen da ("iruditu arren ez dira doi-doi irudi bera"). 70etako *Hotcha!* komiki suitzar-aleman baten erreprodukzio batetik bilduta, manifestu situazionistak gogorarazten ditu. Destatzen duen hatza eraldatuz doa arma baten kanoi bihurtu arte, tiro egiten baitu *Peng!*, bandaren *Peng!* (Too Pure, 1992) izeneko album debutean.

Konpilazio, sasiko, ezezagun, erreferentziatzat hartua edo bazter utzia, diskoa, Tim Ganek esango lukeen bezala, “ideia bilduma” da, eta isil gordean ibili da, ez dagoelako haien aurreko soinuarekin hautsi zuten disko goraipatuen artean, esate baterako, *Mars Audiac Quintet* (1994), *Cobra And Phases Group Play Voltage in the Milky Night* (1999) eta *Sound-Dust* (2001) –nik *Dots And Loops* (1997) gaineratuko nuke–, aipatu musikariak *disko definitibotzat* hartzen dituena.

Ez diot utzi horiek eta beste disko haiek entzuteari, horrexegatik harrezkero gogorapen eta esperientziez zamaturik egon litezke, areago, gertakariak gero eta azkarrago eta sarriagoak izanik. Hala ere, istant horretan geratzen naiz, orain begiratzen eta begiesten dudana nire bizitzako unerik zoriontsuenetako bat izan ahal zuena bezala. Airean da *Tempter* kantuaren soinua, apal eta isilzale baina dramarik gabe ixten, eta Nico miragarri baten gisa urruntzen... Ez dut gogorapena izozten, gorde bai, baina nire zoriaz elikatzen dut segituan... *Volumen 2* misteriotsu hori berriro ere *entzun-adituz*.

OHARRA
Nire biniloaren oharrak:
Label: Duophonic
Catalog#: D-UHF-D09
Format: 2 x Vinyl, LP, Compilation, Limited Edition, Amber
Country: UK
Released: 1995

AUKERAN BESTE IZENBURU BATZUK:
STEREOLAB edo kantu situazionistaren *oraindino*-a
STEREOLAB edo manifestudun musikaren *oraindino*-a
STEREOLAB eta amaiera irekiak

**MARTA VILLOTA.** MADRIL, 1975
Kontzertu antolatzailea, musikari buruzko idazlea
navegandoenlatalante.blogspot.com

[ 74 ]

## **CRU** | SEU JORGE



Wrasse Records, 1995

**A FAVELA É UM PROBLEMA SOCIAL**
Inauteriak, samba eta futbol jokalari batzuekin batera, favela Brasilgo gauzarik ospetsuenetakoa da. Hitza bera mundu guztiko hizkuntzetara pasa da txabolez gainezka dagoen auzo txiroa izendatzeko.

Beste herrialde askorekin gertatzen zaigun antzera, topikoz beteta dago Brasili buruz Europan ezagutzen duguna. Herrialde tropikalek eskaintzen dizkiguten epeltasuna, musika eta dantza dira bertan jasotzea espero duguna, txirotasunari begirada tristea eta urruna eskaintzen diogun bitartean. Horregatik ez ditugu gehiegi ezagutzen garai batean hirugarren munduko herrialde moduan sailkatutako toki horietan burutu eta burutzen ari diren beste adierazpen kulturalak.

Europara eta AEBetara Brasilgo musika asko iritsi bada eta bertako musikan eragin izugarria izan badu ere; azken garaian Brasilgo filmak ikusteko aukera izan badugu ere (favelak gaitzat hartuta gainera), zer dakigu Brasilgo kultur produkzioari buruz? Zehatzago, nire esparrura etorrita, zein dira ezagutzen ditudan artista brasildarrak? Pixka bat urrutirago joanda, irakurri al dut brasildar idazle baten libururik?

Artearen gaira mugatuta, urteak pasa dira Brasilgo artista batzuek harritu eta txunditu nindutenetik. Alde batetik ezusteko ederra izan zen, eta bestetik, haserrea eragin zidan 1997ko Kasseleko Documentan lehendabiziko aldiz bi artista historiko brasildarren lanak ikusi nituenean. Muturreko emozioak, lehenik eta behin bi artisten lanak ikusgarriak eta interesgarriak zirelako deskubritzearen poza; eta gero, ezagutzen ez nituelako haserrea, nahiz eta aspaldiko artistak izan (biak hilda zeuden ordurako); batez ere konturatu nintzelako zein eurozentrikoak garen gure historia eta artearen historiaren ezagupenean.

**UNA MUJER**
Lygia Clark 1920an Belo Horizonten jaiotako eta 1988an Rion hildako artista izan zen. 50eko hamarkadako lehenbiziko lanak azterketa geometrikoen eta analitikoen emaitza izan ziren, baina pixkanaka gorputzaren erabilera eta intuizioaren gaineko hausnarketara zabaldu ziren. Lygia Clarkek Brasilgo kultura nahasiek lagatako geruzak ondo uztartu zituen ordutik aurrerako lanetan.

Kasselen erakutsitako mozorroek txunditu ninduten. Inauterietako mozorroen antzera, erabiltzeko edo janzteko artelanak ziren, ispiluak zituzten maskaren begien zuloen aurrean eta, beraz, gure begia ikusiko genukeen jantzi izan bagenitu. Itsutasunak dakarren hobeto ikusteko aukera mitikoari lotuta, Lygia Clarkek askotan erabili zituen begiak estaltzeko mozorroak, begiradari nagusitasuna kentzeko; baina batez ere, beste zentzuen bidez hautematea zabaltzeko, garai hartako nazioarteko hainbat eta hainbat artisten antzera.

Bestalde, norberaren buruaren ezagupenak oinarrizko erlijioetan edo Afrikatik Ameriketara eramandako sinismen nahasien artean oso zabalduta dauden iniziazio errituak dira. Clarkek material herrikoi horrekin arte garaikidearen analisi joerak gainditu zituen, artearen dimentsio antropologikoari zabaltzeko. Artea ez zen gehiago izango kontenplazio ez-mugikorraren aurrean azaltzen zen objektu eder salgarria; horren ordez gizakiaren askatasunaren zerbitzura dagoen erabiltzeko eta botatzeko tresna izan daiteke, material galkorrez egindakoa eta ekintzarako pentsatutakoa.

Agian horregatik, 1968an atzerrira irten behar izan zuen militarrek Brasilen errepresioa gogortu zutenean, artearen ahalmen askatzailea arriskutsua bihurtu zelako alegia; edo goi eta behe mailako kulturen arteko muga ezabaketak eragin kutsagarria zabal zezakeelako.

**EU SOU FAVELA**

Gauza bera gertatu zitzaidan 1937. urtean Rion jaiotako eta 1980an hildako Hélio Oiticica izeneko artistaren lanarekin. Nahiz eta gazteago izan, Lygia Clarken laguna izan zen arte joera neokonkretoetan ezagutu zirenean. Kolorearen eta formaren gaineko analisian oinarritu zituen hasierako lanak eta betiko hausnarketa gai bihurtu ziren Oiticicaren arte ibilbide laburrean.

Kasselen erakutsitako lanen artean hirurogeiko hamarkadan hasitako *Parangolé* izeneko serieak harritu ninduen. Forma eta kolorea ikertzeari utzi gabe, faveletako materialak erabiltzen hasi zen jantzita eramateko soinekoetan. Dantza-desfileetan jendeak erabil zezakeen koloretako plastiko eta oihalekin, giza eskultura bilakatzen ziren eta ikerketa analitikoak bizitzaz betetzen ziren testuinguru herrikoi baten barruan.

Horren bidez, Oiticica Osvaldo Andradek sortu zuen *Antropofagia* izeneko kontzeptura hurbiltzen zen, Lygia Clarkekin batera. *Antropofagia*-ren arabera, kolonizatutako herri batek kultura dominatzailearen alderdi batzuk irensten ditu, digestioa egin ondoren, eta beste elikagai batzuekin elkartu ondoren, beste modu batera botatzeko edo erabiltzeko.

Kolorez betetako eskultura bizi haiek pozik dantzatzen zuten jaietako desfileetan, artelan bizidunak zirela jakin gabe. Horretan oinarritzen ziren garai hartako artista askoren asmoak, artea eta bizitza elkartzearen alde edo artea bizitzan disolbatzearen aldeko abangoardiako ideia zaharra berritzean. Bizitzan integratutako arte batek ez du artearen kontzientziarik eta horren bidez hasierara bueltatuko ginateke, artearen kontzepturik gabeko garai batera; beraz, hainbeste urte iraun zuen arte mota baten zikloa itxi egingo litzateke.

**ISMAEL MANTEROLA.** ZUMAIA, 1966
Arte kritikaria

## [ 75 ]

## **TILT** | SCOTT WALKER



Fontana, 1995

Lan nekeza da *Tilt*-i buruz idaztea.
Posible al da *Tilt*-i buruz idaztea?
Margotu liteke, filmatu ere bai –beste hizkuntza batzuetara itzuli–, baina *Tilt* deskribatzea lan nekeza eta mingarria da. Osorik entzutea samingarria da, ziztakaria, eta areago sarritan entzutea. Nork eskegiko luke Francis Baconen margolan bat etxeko egongelan? Nork zabaldu nahiko lituzke erraiak modu horretan?

Scott Walkerren musikak, beste edozeinek baino gehiago, muturreko irudi eta sentsazioak eragiten ditu nigan. Beti amildegiaren, zeruaren ertzean. Kuartzoaren doitasunak, izotzaren fintasun ukiezinak eta burdinaren sendotasunak inguratua. Suaren min kartsua.

*Farmer in the City* kantuak ematen dio hasiera diskoari. Ederra da. Bere sonoritateagatik ematen du eliza batean dagoela grabatuta. Sakona eta espirituala da, eta Andrei Tarkovskyren filmak dakartza gogora, *Nostalgia* edo *Ispilua*, besteak beste. IRAGANA.

*Farmer in the City*, ordea, hasiera engainagarria da. Hortik aurrera hasten da ORAINA, FISIKOA dena, HARAGIA. Diskoaren gainontzekoa halako bloke piktoriko bat da, ehundurez eta erritmo-aldaketez josia. Batzuetan melodia dago, beste batzuetan ez. Batzuetan bihotz taupadak diruditen perkusioak daude eta, ondoren garrasi itzel batekin apurtzen dira. Giroak inguratu eta itotzen zaitu, espiral baten barrua bezalakoa da. Eta isilune ederrak ere badira, ondoren datorren soinua are basatiago bihurtzen dutenak.

Eta bere ahotsa, AHOTS HORI. Lehenengo planoan BETI. Bere ahotsa da agintzen duena, eta interpretazioa, hitz bakoitzaren ahoskera, da abesti bakoitza xedatzen duena. Melodia ekartzen duena, edo melodiaren gabezia zehazten duena. *Tilt* hain da indartsua non inposizioa dirudien. Ez du iradokitzen. Dena dago lehenengo planoan. Sekretuz beteta dago, baina lehengo begiratuan atzeman daitezke, eta aldi berean asmaezinak dira.

Ematen du Scottek birrindu egin dituela aurreko erreferente musikal guztiak eta ondoren suntsitutako zati guztiak bildu eta itsatsi dituela, bere senak agindu dionari jarraituz. *Tilt*-en melodiek eta ehundurek muturreko konplexutasuna dute, eta bere abstrakzio-maila hain handia denez, azkenean arras mehatxagarria suertatzen da. Eta bere ahotsa, AHOTS HORI.

**ANA CABEZAS.** ORDIZIA, 1974
Artista plastikoa
www.anacabezas-foto.blogspot.com

[ 76 ]



## HANDWRITING | RACHEL'S

Quarterstick Records, 1995

NO VÁLIDO PARA VIAJAR
*Nire pausuen soinu banda*

Rachel´s-en *Handwriting* belarri zuloan barrena, trenaren zain nago.

Trenbidea daukat pare-parean eta nire gorputza erraietara erortzen irudikatzen dut.

Ez naiz suizida, ez daukat beharrik, ezta gogorik ere, baina irudi horixe ikusten dut hemen geldi nagoelarik.

Zutitu eta trenbidearen aurrean paratu naiz, ertz-ertzean nago, oinaren erdia airean trenbide zulora erortzeko prest, hala gelditu naiz bidearen beste aldera so trenari itxoiten. Beste aldea jendez beteta dago, imajinatzen dut jende andana eskutik heldu eta trenaren aurrera salto egiten, irribarrea ezpainetan, trenaren freno hotsa eta gorria.

Iritsi da trena halako batean, baina inork ez du bere enkontrura salto egin eta ni barrura noa isilik jende pila beste aldean utzita. Nire trena abian da.

Bagoiko pasilloan barrena otu zait badela aukera bat, txikia izan arren, trenak beste tren bat aurki dezan parez-parez bere bidean. Eta hotzikara xamur batez sentitzen dut talka itzela nire azala zeharkatzen.

Leiho ondoko eserleku batean abandonatu dut nire gorputza eta begiak itxi ditut trenaren joanak dardara eragiten didan artean. Zain gelditu naiz.

Barren-barrenean badakit ez dela deus jazoko, treneko bidaiak monotonoak direla, trenbideak jartzen duela erritmoa eta billeteak helmuga.

Hala ere, beti dago aukera bat, xumea bada ere, nire aurreko gizasemeak bihotz apurtua, erdibitua, umiliatua eta mutilatua izateko. Eta agian gizon horri hirugarren tuneleko iluntasunean bere mina jasangaitza iruditSuko zaio, eta bat-batean, abisurik eman gabe negarrez orroka jaiki eta hurrengo tunelean barneratu baino istant bat lehenago gabardina irekiko du eta erakutsiko dit bere bular dinamitaz jantzia. Eta gero iluna.

Baina gaur ez, gaur ez da halakorik gertatuko, aurrean dudan gizasemea zurrungan doa burua zintzilik erraien erritmoan bili-balan. Lepoko minez esnatuko da ziur aski.

Leihora itzuli dut begirada, ez dago dudarik, bidaia zinez arrunt honetan ez da deus gertatuko, trenzaina etorriko da, emango diot txartela eta bitartean paisaia joanez joango da azken geltokiraino.

Baina badago aukera bat, ñimiñoa bada ere, trenzaina etortzen denean poltsa, poltsiko eta inguru guztiak miatu eta bidaia txartela ez aurkitzekoa. Imajinatzen dut trenzainaren bibotea harrotzen eta nerbiosoki klikatzen bere tramankulua. Momentu horretan hiltegira daramaten arkumearen begiak izango dira nireak, trenzaina pausu seguruz hurbilduko da emergentziazko geldialdiko palankara eta amorruz tiratuko dio, trena tupustean gelditu eta trenetik at jaurtiko du ene gorputza eta han geldituko naiz ezerezez inguraturik.

Ez da halakorik gertatu ordea, trenzaina etorri da eta nik nire txartela prest daukat. “Eskerrik asko eta agur”.

Trenak aurrera jarraitu du eta heldu da azkenean nire geltokira, aurreko gizasemeak lo darrai oraindik. Patxadan jaiki eta aterantz noa, bere albotik pasatzean zeharka begiratu diot kuriositatez eta nahi gabe ikusi dut gabardina azpitik zintzilik daukan metxa zatia.

Kanpoan trenbideari begira gelditu naiz, trena aldentzen sumatu dut eta tunelean sartu baino lehen itzali dut mp3a badaezpada.

Isildu da Rachel´s-en *Handwriting*.

**ODEI ARREGI.** AZKOITIA, 1984
Musikazalea

**[ 77 ]**

## RED MEDICINE | FUGAZI



Dischord, 1998

Etxera sartzen naizen bakoitzean “One thing stays the same” dioen kartel horia ikusten dut.

Ez dakit zer esan nahi duen. Zein ote zen Fugazirentzat berdin mantentzen den gauza? Zein, kartelaren egilearentzat?

Politika ez da diskurtsoetan egiten baizik eta egunero hartzen ditugun erabaki ttiki eta ez hain ttikietan. Ogia non erosten duzun. Edozeinentzat eskuragarri diren 5 dolarreko kontzertuak eta 10 dolarreko diskoak eginez. Kulturarekin merkataritza egiten dutenei bizkarra emanez. *Do It Yourself*.

Mugek estutzen zaituztenean haiek hausteko ausardia behar da eta *Red Medicine* ausardia honen adibide bikaina da.

Disko zoragarri honek baditu jada hamahiru urte. Urte hauetan joan dira lagun batzuk. Joan eta etorri dira maitaleak. Zenbat etxe, herri edo hiri utzi ditugu atzean? Borroka batzuk badoaz eta berriak etorriko dira. Gure auzoan, Moskun, taberna-zulo kuttunena desagertu zen eta orain ez da arrunta Fugazi entzutea. Fugazi taldea bera ere joan da.

Orduan, badugu esaterik, kartelak dioen moduan, hain hauskorrak eta iragankorrak diren gure bizitza hauetan gauza bakar batek ere berdin eusten diola?

Taberna batean edo lagun artean, musika hau entzuten dugunean, lehenengo doinuekin elkarren arteko begiradak datoz, kantuak gero, eta besarkadak, musuak. Gure elbarritasun emozionalak eta guzti, elkar maite dugu. Musikarekin batera bizirik gaude.

Beharbada gure esperientzia sakonenak bakardadean bizitzeko jaioak gara, akaso hori da dagoen guztia. Baina batzuetan sentitu dut besteen erraiak benetan ukitu ditzakedala. Fugazik ez zuen musika saltzeko egin. Beraientzat eta jendearentzat inportantea izan zitekeen musika nahi zuten egin. Emozioz, energiaz, duintasunez eta humanitatez beteriko musika.

Fugaziren musikaren zainetan dabilen odola gorri-gorria da. Gure arteko distantziak gainditu eta gure arteko mugak leherrarazi ahal dituen gorria. Mundu hau pixka bat berotzeko, batzeko eta osatzeko gaitasuna duen sendagai gorria.

Gorri bera ikusten dut nire inguruko musikari lagunek martxan dituzten proiektuetan. Egunero hartzen dituzten lanetan, botatzen dituzten izerdi eta sufritzen dituzten minetan. Beraien aukeren muinean dagoen motibazioan. Eta sinetsi nahi dut baietz.

Agian bai: *one thing stays the same*.

**RAMON M. ZABALEGI.** MOSKU (IRUN), 1976
Diseinatzailea, ilustratzailea, kontzertu antolatzailea
ramonmzabalegi.zxq.net/



## **TINDERSTICKS II** | TINDERSTICKS

Island Records, 1995

**MALKO TXIKIEN OZEANOA**

Kiskalitako paisaiari aurre egiteko modu desberdinak. Bertan eserita berriz landare berri bat irten arte zenbat denbora pasako den penatzea edo behin izan zenaren edertasun galkorra gogoratzea, istant bakarra izan bazen ere. Tindersticks taldearen bigarren diskoan azken hau da aukera, nahiz eta berea ez den edertasun goxoa, ezta eguzkitsua ere.

Nola azaldu disko jakin batekin harreman pertsonala daukazula? Zein dira hitz egokiak kantu horiek eta sekuentzia horretan uneoro gertu izan beharra duzula esplikatzeko? Musika, beste zenbait gauza bezala, ulermenari ihes egiten dion zerbait da. Woody Allenek *Manhattan* filmean esaten zuen garuna neurriz kanpo baloratzen dugula, gauza inportanteek beste sarbide batzuk aurkitzen dituztela gure barrura iristeko.

Jakina. Tindersticks taldearen bigarren lan honi buruz aritzerakoan azpimarratzea daukat, adibidez, nola disonantzia errekurtso dramatiko bikaina zen hasieratik, *El diablo en el ojo* kantuan. Konta dezaket bestela nola Stuart Staples abesten hasi orduko, norbaiti despedida hitzak esanez –*"Ez ditut zure begiak itxiko oraindik, ez dut argia itzaliko / hemen badago ikusi behar duzun zerbait*"– haren inguruan halako flamenko tankerako akordeak amiltzen ziren bitartean, garondoa kizkurtu zitzaidan aurreneko aldian. Eta hurrengo guztietan. Stuart Ashton Staples, erreberberazioa berezkoa duen abeslaria, taldearen lehenengo diskoak aurreratutako gauza guztiak anplifikatu zituen disko honen oinarria zela baieztatzea daukat konbentzituta. Ahots horrek eta hari sekzioak, tronpeta zertzeladak tartean eta organoa lagun, *Tindersticks soinua* definitu zutela, aurrerantzean Nottinghameko taldearen identitatea. Eta azaltzen saia naiteke *A Night In* kantuan abeslariak hunkituta ematen duela baina ez artifiziala. Eta Staples amildegitik gertu ibiltzen dela beti baina ez duela zeharkatzen inoiz emozioaren eta afektazioaren arteko marra fin hura. Gizonak haragizkoa izaten jarraitzen duela *Tiny Tears* abestian. Malko txikiei buruz ari da kantu horretan, guk eragindakoak seguru asko. Alboan izan dugunaren aurpegian ikusi ere ez ditugunak negar gehiegi egin duen arte.

Erreferente bila, lagungarri izan daiteke aipatzea *My Sister* delakoak The Velvet Underground gogora ekartzen didala. Zehazki, *The Gift* ipuin iluna, zeinaren protagonistak bere burua bidaltzen zion postaz maite duen pertsonari eta honek, ezin paketea ireki, zerra hartu eta txikitzen zuen, barruko amorantea eta guzti. *My Sister* ere umore beltzean dago beratua, baina instrumentazio atsegin eta ia *naif* bat duenez, narratzailearen hoztasunarekin egundoko kontrastea sortzen du, diskoaren ezaugarri nagusietako bat da hori. Kontrastea ere, bi



ahotsen artekoa kasu honetan, The Walkabouts taldeko Carla Torgerson lagun egindako *Travelling Light*-en zirrararen klabea da.

Hori dena badaukat nola edo hala kontatzea. Baina azaltzea *Tindersticks II*, desolazioan pareko gutxi daukan disko horrek, tristura eragin ordez kontrako efektua zergatik sortzen didan, istorio ilun triste horiek eguna nolatan alaitzen didaten, alferrik da. Besarka ezin den disko honek txiki sentiarazten nau. Txiki eta zoriontsu.

**ASIER LEOZ AIZPURU.** DONOSTIA, 1970
Musikazalea
www.blogseitb.net/portobello/

[ 79 ]



## _**SND** | MICROSTORIA

Thrill Jockey, 1996

*Beroki baten barrualdearen soinu banda (Jarri diskoa mugikorrean eta sakelan sartu).*

Disko hau musikaren lo-kuluxka da, sasoien arteko musika. Begirada beste edozein lekutara zabaltzen duen loarina. Denbora askea da, denbora librea, aisialdia, denboraren aisialdia. Arratsaldean jolasten den denbora.

Errebelaziorik gordetzen ez duten soinuak, gogora ezer ekartzen ez dutenak, airean deuseztatzeko zorian dira, isil-isilka, desagertu besterik ez baitute nahi. Markus Poppek eta Jan St. Wernerek aukera eman diote hots bakoitzari bere dantza, bere izaera ezkutua aurkitzeko. Musikari *entzunzaleak* dira eta entzunaldi berritu bat eskaintzen digute. Ustekabeko konplexutasunari bidea ematen dioten inprobisatzaileak. Entzunaldian murgiltzen bazara, euliak ere kulunkatuko lituzkeen zabuak mendean hartuko zaitu. Hemen, ezegonkortasuna forma ematen duen potentzia da, esandakoari garaitzen zaiona, amaiera emanez. Disko hau isiltasunaren biolentzia ederra da. Bertoko abestia, hemengoa.



- Zein ote da erritmo ezin konplexuago hau, dantzaezina dirudiena?
- Galsoro baten kulunka da, atea itxita duen hozkailu baten barrualdea.

Hau ez da hauskortasunaren musika, baizik eta eguzkitan jarritako arropa-esekileku baten basakeria arriskutsua.

Lur planetaren sehaska-kanta da, bere sehaska-kanta: itxi errezelak eta entzun ezazu.

**RAUL DOMÍNGUEZ.** BARAKALDO 1984
Marrazkilaria

## [ 80 ]

## **AT** | DUT



Esan Ozenki, 1996

### BIDAIA

Ateri zegoen, 1996ko urriko egun astun samarra zen, hits eta sargoria. Unibertsitateko egun fundamentubako bat gehiago. Kafetegiko solasaldiek asperturik, Leioako pisu partekatu narratsean *The Simpsons*-i begira, *Karma dice* irakurriz, edota *Gazteak* eta Faemino y Cansadoren esketxak oroituz pasatzen genituen une dibertigarri urriak. Ostirala zen, hori bai. Ostiralek beti izan dute zerbait tentagarria, zerbait askatzailea. Haurra nintzenean amonarenetik etxera nindoala kalera zihoazen gazteak ikusten nituen ostiral iluntzetan, euren *txupak* jantzita. Tabernetako musika eta zarata entzuten nuen (artean ez nekien rocka zer zen ere), paretetan itsatsitako kartel ugarietan paratzen nuen begirada eta herriko kioskoan kontzertuak izaten ziren. Lehengusu zaharragoek musikarekin loturiko istorioak ekartzen zituzten bueltan (Hertzainak eta Itoiz zituzten gustuko nireek garai hartan). Betiko egon dira geroztik ostiral gauak musika kontuekin loturik, musika kontzertuekin batik bat, Urretxuko Gaztelekuan (umetan beldurra ematen zigun leku huraxe bera) edo Azkoitiko Matadeixen entzundako andana haiekin.

Aritz laguna Donostiatik joana zen Bilbora, *dedo* eginez. Abentura bizigarritzat genuen garai hartan behatza atera eta errepide izkinan nork geratuko zain egotea. 20 urteak bete gabe, errebeldetzat genuen geure burua; *Galdu arte* irakurri berriak ginen. Makina bat kontzertutarako bidea egin genuen molde hartan, baita pertsonaia xelebre askoak ezagutu ere. Gure barruko xelebrea ere ezagutzen hasiak ginen.

Beste ezertarako astirik gabe sartu ginen Kafe Antzokian. Wemean talde suitzarrak ere jotzen zuen. Baina Hondarribiko hirukoa entzuteko irrika zen gurea. Ordurako hirukoa baitzen. *Egin Irrati*-ko *Igo Bolumena* saiotik iritsi zitzaigun albiste hura, eta bigarren diskoa ateratzekotan zirela ere bai. Askoz

gehiago ez genekien, baina zerbait berezia espero genuen. Nahi genuen. Behar genuen.

Beste kontzertu batean ezagutu nuen Dut, ia txiripaz. Andoaingo gaztetxean ikusi nuen aurrenekoz, Belly Button bikotearekin batera. Bost ziren orduan Dutekoak. Kontzertua hasi aurretik Xabi Strubell ikusi nuen gaztetxe kanpoaldean kokoriko eginda jarrita. Irudi bitxia egin zitzaidan. Txoritxo bat zirudien, *birdy* bat. Aritzek esan zidan bizkarreko arazoak izaten zituela. Aritz eta Agus lagunak ausartagoak nituen, eta lehen lerroetan bizi izan zuten *Urtsua uda* soinu tobogan harekin hasitako kontzertua. Dantza batean aritu ziren, izerdi patsetan. Neu, uzkurrago, gaztetxeko atzeko partean; *Legea hil, Sexu mugarik ez, Itxura faltsuak*, *Hutsik dauden hitzak*, *Zurrunbiloa*... Definitzen zaila den erauntsi moduko bat sentitu nuen erraietan. Hura inoiz entzun gabeko zerbait zen. Hura beste soinu bat zen, hura beste mundu bat zitzaidan.

Baina mundu berri hura bete-betean Bilboko kontzertuan azaldu eta barneratu zitzaidan, ia tupustean, zaplazteko lehor baten gisan. Zaplazteko estetiko bat izan zen. Ziur asko garai jakin hartan behar nuen zaplaztekoa. Gogaitu antzean nintzen festa giroko musikarekin, kamixeta arraiadunekin eta euskaldun jatorraren errituekin (gerora horietako batzuk berreskuratuko nituen, bertso eta pilota zaletasuna, esaterako). *Sokaren itzala* kantuaren lehen akordeak entzun nituen orduko, zapla!, harridura eta barne asaldura, biak batean. Lagunari begiratu nion kantuaren erdialdera. Berak niri begiratu zidan. Flipatu aurpegia zen berea. Halakotxea izango zen nirea ere. Sokaren itzalak gatibu hartu gintuen. Ezin askatuta geratu ginen kontzertua amaitu artean. Zer zen hura? Zein barne estoldetatik ateratakoa zen soinu hura, belaki xurgatzaile hura, indar hura? Zer arraio deitu behar genion musika hari? *Post* atzizkiaren nagusitasun eroso eta aspergarria iristeke zegoen oraindik zorionez. Triangelu miragarria zen Xabik, Josebak eta Galderrek osaturikoa. Bermudatakoa bailitzan, han sartu eta galdu nintzen. Betiko. Jendez gainezka zegoen antzokia, jendez inguraturik nengoen. Baina mundutik at ni, *At*-en munduak xurgaturik nindukan. Ez nuen ez beste ezer ikusten ez entzuten. Soinu estetika berri bat, oholtzaren gaineko estetika berri bat jaso nuen.

Kafe Antzokian bizi izandako hura behin eta berriro biziberritu nahi izan nuen orduz geroztik etxean ere. CDa Durangoko Azokan erosia nuen. Sartu musika ekipoan eta neu bihurtzen nintzen protagonista. Fikziozko gitarra esku artean hartu eta zenbat kontzertu eman ote nituen ispiluaren aurrean –bai, bai, keinuak eta imintzioak entseatzen nituen, noizbait musikari izan behar banu ere– buruz ikasitako kantu zerrenda harekin. *Sokaren itzala, Fumut, Sortu eta haztea, Haize eza*... Apoteosia *Eskuzuri* eta *Bidaia*-rekin iristen zen. Katartikoak biak. Bizilagunek zoraturik nintzela pentsatu behar zuten *Bidaia!!!!* amorruz bete hura orru egiten nuenean. Entzun beharra zeukaten inondik ere!

Bidaia baten hasiera izan zen *At*. Ateak, leihoak eta, batez ere, belarriak zabaldu zizkidan. Musika entzun eta bizitzeko modua aldatu zidan. Haurtzaro eta nerabezaroko lehen urteetan ia oharkabean entzuten nuen musika. Gurasoen bidez (The Beatles, Simon & Garfunkel eta trikitixa, Laja eta Landakanda batik bat!!!), edota,

batez ere, lehengusuen bidez iristen zitzaidana entzuten nuen (Itoiz, REM, The Police, Duncan Dhu, The Communards...). Nerabezaroko urteetan taldeko (artaldeko) sentitzeko entzuten nuen musika (Su ta Gar, Negu Gorriak, Metallica edo, batere gustatzen ez zitzaidan Etsaiak...). Dut entzuten hastean *berezi* sentitzen hasi nintzen. *Berezi* zentzurik *egonarzisistenean*, batetik. Banekien zerbait berezia bizitzen eta gozatzen ari nintzela eta ez zela oso *masifikatua*, ezta neure ingurunean ere. Horrek bazuen bere puntua. Baina, *berezi* sentiarazi ninduen, ni neu sentiarazten ninduelako. Nik neuk esan nahiko nituzkeenak esaten zituzten. Eta, batez ere, nik esan nahiko nituzkeen moduan. Gizarte eta politika gaiei adina barne kontuei erreparatzen zieten, baina poetika berezi batetik. Batzuetan argiago, besteetan ilunago. Iradokitzaile beti. Eta musikarekin uztardura ezin apartagoan. Sentitzeko adina aukera ematen zidaten sentiturikoa kanporatzeko. Hunkitzeko adina motibo ematen zidaten amorrua kanporatzeko. Rock indartsua zen, trinkotasun liluragarri batekoa, baina era berean neuk beti gustuko izandako poparen zantzuak zituen. Pop kantu bikainak iruditzen zitzaizkidan.

Musika beste modu batera entzuten hasi nintzen, askoz barnekoago, neureago den zerbaiten modura. Ni neu hasi nintzen bila, gustukoaren bila. Ez nintzen konformatzen iristen zitzaidanarekin. Berezi ez, baizik eta neu sentiarazten ninduenaren bila hasi nintzen. Ez zen meritu guztia Dutena eta *At*-ena izan. Garai bertsuan izan nuen Pixies taldearen berri ere. Oso desberdinak ziren euren artean, baina zer ezkutuko batek batzen zituen neure baitan. Bien eskutik hasi nuen bidaia. Haiek gabe ez nituzkeen BAP!!, M-ak, Ruper Ordorika, Anari, Portishead, Mikel Laboa, The Smiths, Fugazi, Lisabö, Joy Division, Akauzazte, Bob Dylan, Leonard Cohen, Nina Simone, Bonnie Prince Billy, Cat Power, Dominique A, Kiko Veneno, Enrique Morente, Robert Wyatt, Migala, Robert Johnson, Mursego, Daniel Johnston eta abarrak ezagutu, disfrutatu eta neure egiteko aukerarik izango...

Kafe Antzokiko kontzertu eraldatzaile hura ikusi osteko egunean *dedoz* abiatu genuen bidaia Bilbotik Zumarragara. Mendizale bikote batek eraman gintuen Durangoraino, eta neska *makarra* jator batek handik herrira. Bilbo eta Durangoko bi farolatan boligrafoz idatzitako pintada bana utzi genituen: *Dut (at)* eta *Sokaren itzala* zioten. 1996ko urriko ostiral ateri sargori hartan hasitako bidaia ez da amaitu oraindik.

**GORKA EROSTARBE.** ZUMARRAGA, 1977
Kultur kazetaria

[ 81 ]



## **ARISE, THEREFORE** | PALACE

Palace Music, 1996

Orduak igarotzen nituen 1997-98ko fakultateko bigarren ikasturtean marrazten eta Palace taldearen *Arise, Therefore* entzuten. Kasete batekoak ziren orduko entzuketak.

Konturatu nintzenerako nire musika unibertsoko errege bihurtua zen Will Oldhamen ahots triste urratua. Marrazketak musikari jarraitzen zion eta bazirudien ez nuela beste ezeren beharrik bi elementu haietan barneratzen nintzen plazerezko momentu haietan. Esan bezala, orduak igaro nitzakeen neuregandik hain gertu sumatzen nituen doinu haien babespean.

Palaceren aurkikuntza izan zen bestelako izaera eta testuraz osatuta zeuden musika moduak ere bazirela eta neure bizitzaren parte bilaka zitezkeela ohartarazi ninduena. Eta bai, iritsi ziren, benetan desio nituela jakin ere egin gabe, garai hartako egunak soinu banda desberdin batekin beteko zituzten doinuak.

Vic Chesnutt, Nick Drake, American Music Club, PJ Harvey… denak joan ziren nire belarria osatzen eta aberasten eta ene bihotzeko zokoak musikatzen. Ordura arte sumatu ez nuen moduko musika gose batean barneratua nintzen.

Palaceren entzuketak, artifiziorik gabeko era garratz bezain samurra osatzen zuen soinu antolakuntza bat posible egiteak sorrarazten zidan zirrara posible egin zuen. Espazio eta denboran galdua egon den altxorra neurekin nuen eta nahi hainbeste aldiz entzun nezakeen. Garai hartako bizipenek beren musika eskuratua zuten.

Zaila zait disko hau entzuteak nora eramaten nauen adieraztea. Tristura eta malenkonia esan ditzaket, baina misterioa, poza, samurtasuna eta goxotasunezko sentipenak ere jasotakoaren parte bilakatzen dira entzuten dudan bakoitzean.

Urteetan ondoan mantendu zaidan laguna bezala izan da diskoa.
Inoiz ikusi ez dudan lekua, badakidana aldi berean existitzen dela eta egunen batean agertuko dela.
Naizen gizakiaren izaera aldakorraren esentzia non aurkitu dezakedan adierazten didan soinua.
Saihesten saiatzen naizen itzalaren lagun izatera eramaten nauen presentzia.
Galdutakoa ere beti geure baitan daramakigunaren sentimendua.
Sinpletasuna balore bilakatzen denekoa.

Hori guztia da entzuketak neuregan pizten duena. Beharbada horretxegatik gaur egun entzutea erabakitzen dudanean, benetan horretarako momentu egokia den edo ez galdetzen diot lehenik neure buruari. Hala dela erabakiz

gero, neguan itsasoan bainu hotz bat hartzea izan daitekeenerako prestatzen dut ene izatea, denboran zehar eginiko bidaian murgiltzeraino.

**SABRINA ROMERO MARCOS.** AZKOITIA, 1977
Musikazalea

[ 82 ]

## **MACORINA** | CHAVELA VARGAS



RCA, 1996

### NI NAIZ MACORINA, EZ BESTE INOR

Batzuetan saiatzen gara gauzek *berezi* izaten jarrai dezaten. Begiak ixten ditugu gogor, itsutu nahian bezala, ez ikusteko nola norberarentzat hain berezia den hori, beste askok ere berezitzat duten. Musikarekin begiak ez ezik, belarriak ere estali behar izaten ditugu, *kantu hori* edozein lekutan ez entzutearren. Baina askotan onartu behar izaten dugu guretzat orain *hain berezia* dena, ez dela betiko.

12 urte dituzula izebak kotxea hartu eta Madrila eramaten zaitu, kontatu dizulako bertan, Thyssen museoan Frida Khaloren koadro bat dagoela, ekarri berri dutela eta denbora gutxi iraungo duela bertan. Gogoratzen duzu nola, ezin loak hartu pasatzen duzun aurreko gaua, Olentzeroren existentzia apurtu zizutenetik gogoratzen duzun zirrara indartsuena biziz bezala. Gogoratzen duzu, loak ezin hartu eta mesanotxeko argia piztuta banan-banan errepasatzen dituzula Taschen liburuko Fridaren koadro guztiak, galdetuz bihar ikusiko duzuna zein izango ote den. Bai, 12 urte dituzu eta jada *friki* mitomano bat zara.

Gogoratzen duzu, inuzenteki orduan ere, uste zenuela Frida *berezia* zela, kasik zurea bakarrik, edo *enkualkierkaso* zurea eta izebarena, gero handitzen zoazen heinean, konturatzen zara *Che* berri bat dela eta haserretu egiten zara. Baina hori ere ikasi egiten da.

Oraindik begiak gogor itxiz gero, Fridaren koadro txiki hura ikusteko gai naiz batzuetan, eta nola izebak bizkarra zaindu zidan museo batean egin daitekeen bekatu handiena egiteko: koadroa pixka bat laztandu.

Kotxean itzuleran baina, galdetu nion izebari ea musikarik bazuen, eta berak ezetz, ez behintzat niri gustatuko litzaidakeen ezer. Ni kaseteen artean saltsan nenbilen eta han aurkitu nuen: Chavela Vargas. Agian izebak ez du jakingo, baina Chavelaren istorioa kontatzearekin bat, nire bigarren maitasun platonikoa pizten hasi zen. Gogoratzen dut orduan, nola egin genuen bidaia osoa, gogotik abesten "*¡Ponme la mano aquí Macorina, ponme la mano aquí!*" Oihuka, garrasika, hura imitatzen saiatuz.

Eta orduan izan nintzen bigarren aldiz ume *friki* mitomanoa, gelako paretak Fridaren eta Chavelaren argazkiz beteta dituen 12 urteko ume *friki* mitomanoa.

Gero denbora pasatzen da, eta lesbiana egiten zara (bai, batzuetan pasatzen da, lasai, ez da horren *horriblea*), eta gainera feminista, eta konturatzen zara zure bi lagun berezi horiek gero eta gehiago ikusten dituzula edonon. Hala ere jarraitzen duzu, Chavelarekin kantuan, eta tarteka pentsatzen duzu, bizitza azaldu ere egiten dizula, zuri kantuan dabilela, zure bizitza eta amodioak ulertzen dituela. Bai, jada lesbiana dramatiko bat bilakatu zara, eta hor ez dago atzera bueltarik. Baina gero, konturatzen zara ez zarela zu hain berezia, bihotza apurtuta kalean zehar dabilen lesbiana askok darabilela kaskoetan Chavela (ezin daiteke neurtu zenbat min egin dion Chavelak lesbianen bizitzari). Eta haserretu egiten zara. Hainbeste haserretu, Chavelaren disko denak gorde egiten dituzula, txoko batean, eta gorrotatu egiten duzula eta esaten diozula argazkiari begira: "para eso escucho a Bebe, ¿sabes?". Bere errua izango balitz bezala edo.

Baina urteak berriz ere pasa egiten dira, eta amaren etxera itzultzen zara udara batez, eta atzetik dabilkizu esaten ea garbiketa bat noiz egingo duzun zure gelan, eta horiek dira momentu klabeak. Han aurkitzen duzu, behin maitatu zenuen andre hura, hautsez beteta, *Macorina* dioen CDan begirada galduaz, serio.

Momentu horiek dira urrea balio dutenak. *Play* sakatu, zuzenean azkeneko kantua jarri, eta kotxe hartan bazina bezala, behin eta berriz, gelditu gabe, "*¡Ponme la mano aquí Macorina, ponme la mano aquí!*" garrasi egiten duzu eta mundua popatik hartzera bidaltzen duzu, esanez, "zu betiko zara berezia niretzat, beste horiek ez dakite deus… Zu eta ni Chavelita, zu eta ni".

**KATTALIN MINER.** HERNANI, 1988
Blogaria
kattalintxo.blogspot.com

## [ 83 ]

## **WESTERN MUSIC** | WILL OLDHAM



Acuarela - Ovni records, 1997

**ETORKIZUNA**

### 1.

Orduan zigiludun gutunak idazten genituen eta kaseteak bidaltzen genizkion elkarri eta zuri-beltzeko argazkiak egiten genituen eta kontzertuetara joaten ginen ea behingoz gure bizitzetan zerbait gertatzen zen ikusteko. 1997az ari naiz. Hamabost urte joan dira ordutik eta garai hartako oroitzapenak gordetzen ditudan zapata-kutxak bilatu behar izan ditut orain idazten ari naizenari buruzko hau guztia aurkitzeko. Eta hortxe zeuden: argazkiak, gutunak, kontzertuetako sarrerak eta oraindik dena egiteke zegoeneko egunak. Orduan geure buruari galdetzen genion ea nolakoa izango zen gure bizitza, ea non egongo ginen hamar urteren buruan, ea atzerrian edo betiko lekuan biziko ginen, ea, behingoz, noizbait, bakarrik egoteari utziko genion...
Horixe zen etorkizuna. Duela hamalau urteko gure etorkizuna.

### 2.

Argazkietako batek data eta lekua ditu idatzita atzeko aldean tinta gorriarekin: 1997ko urriaren 18a, Purgatorio aretoa, Berango.

Gogoan dut haize handiko gaua zela eta aretoko leihoetatik palmondo bat zegoen baso bat ikus zitekeela eta ekaitzak gogor astintzen zituela adarrak eta une batez kontzertua eta zuhaitzak aldi berean jotzen egongo balira bezala izan zela eta hori hunkigarria izan zela.

Orduan Will Oldham oraindik ez zen Will Oldham, edo guretzat ez behintzat, Palace Songs izenarekin sinatutako *Hope* (Domino, 1994) disko harengatik soilik ezagutzen baikenuen. Ziurrenik Carlos izan zen kontzertuaren berri izan eta deitu zidana eta Will Oldham delako batek hurbil joko zuela esan zidana eta Will Oldham delako hori Palacekoa zela eta orduan bai, Palacekoa zela jakinik, *Agnes, Queen Of Sorrow* kanta abesten zuena, joango ginela jakin genuen eta agian gau hartan, behingoz, zerbait gertatuko zela, edozer, baina zerbait, gure bizitzetan.

3.
Luisi deitu diot Purgatorioa oraindik existitzen den galdetzeko. Urteak dira kontzertu aretoak itxi zuela, baina oraindik eraikina han den jakin nahi dut eta non dagoen zehazki, Berango eta Sopela inguruan errepide eta saihesbide berriak egin baitituzte eta ez naiz ziur tokia aurkitzeko gai izango ote naizen. Luisek ez du erantzun. Berangorako bidea hartu dut; konfiantza dut memorian eta halako intuizio batean, eta hasieran despistatu eta irteerarik gabeko bide batean bukatu dudan arren, areto ohia izan daitekeen eraikin bat ezagutu dut laster. Urte asko pasa dira, fatxada berde turkesa dago margotuta eta ez dago ni bilatzen ari naizen lekua dela adierazten duen ezer. Atearen aurrean, espaloian, gaizki aparkatutako auto bat dago eta autora sartzekotan den tipo batek begiratu eta nonbaitetik ezagutzen nauela esan dit. Bai, elkar ezagutzen dugu. Javi Leta da, El Inquilino Comunistako bateria-jotzailea izan zena. Purgatorioa bilatzen ari naizela kontatu diot eta aretoaren aurrean nagoela berretsi dit. Gero Will Oldhamek egin zuen kontzertuari buruzko zerbait idazten ari naizela esan diot eta Letak gogoratu du haiek ere jo zutela aretoan El Inquilinorekin eta behin Kike Turmixen kontzertu bat ikusi zuela, zeinetan The Pleasure Fuckersen liderrak eszenatokia apurtu baitzuen. “Imajinatu Kike oholtza belaunen parean zuela eta zulo batez inguratuta, baina abesteari utzi gabe”, esan dit. Gero areto ohiaren ondoan dagoen estanko batera pasatzera gonbidatu nau eta Fernando Ansoleaga aurkeztu dit, estankoaren jabea. “Tipo honek aretoan gertatu zen guztia daki”, esan dit. Eta Fernandok goieneko urteez, lekuaren abandonuaz eta inguruaren geroagoko birmoldaketaz hitz egin dit. Orain, eraikinaren beheko aldean, La Palmera izeneko garagardotegia dago. Eta El Cielo Del Purgatorio izan zen lokalean, bere sasoian aretoaren bigarren taberna zena, ogitartekotan espezializatutako taberna jarri dute.

- Eta Purgatorioa, galdetzen diot.
- Eliza ebanjelikoa da.

4.
Will maitea,

Uste dut gustura entzungo duzula 1997. urteko bira hartan jo zenuen tokietako bat leku sakratua dela orain. Zure kantetako baten zati ere izan zitekeen. Aretoa igandeetan soilik zabaltzen dute eta estankoaren jabeak kontatu dit ebanjelistek arazo batzuk izan dituztela auzoekin, haien salmo, kanta eta txaloak zalaparta gehiegi baitira igande goizetarako. Ikusten duzunez, dena da zu hona etorri zinenean zenaren nahiko antzekoa: kantatzea da kontua oraindik ere, Jaunari (Oh, Lord!) edo Agnes tristeziaren erreginari. Purgatorioko arima herratuek salbamen bila jarraitzen dute.

Ezin izan naiz aretora sartu, itxita dago, baina argazkia egin dut kristalen bidez eta egiaztatu dut xake taula formako zoruak berdin jarraitzen duela. Atzealdeko basoa ikusten uzten duten leihoek ere bai.

Palmondoak dirdira egiten du eguzkitan. Gustatuko litzaidake unez batez ekaitza eta haizea itzuli izan balira, baina ez da hala gertatu. Apirileko goiz eguzkitsu bat da.

5.
Migala zuzenean ikusi genuen lehen aldia ere izan zen, haien aurreneko diskoa (*Diciembre 3.a.m.*, Acuarela) argitaratu berri zuten eta ez genekien haiei buruzko ezer. Jesús Llorentek CDak saltzen zituen zutabe baten ondoan eta Acuarela deitzen zen diskoetxe bat zuela esan zigun eta laster itzuliko zela kontzertu gehiagorekin.

Orain irakurri dut *Western Songs* diskoaren grabazioan Will Oldhamek The Dirty Three talde australiarreko kideekin kolaboratu zuela eta birako kontzerturen bat bertan behera utzi behar izan zuela DTko biolinistak arazoren bat izan zuelako bisarekin.

Purgatorioan, Migalako musikariez lagunduta igo zen eszenatokira Oldham. *Hope* kantatu zuen, Palace kantatu zuen, *Agnes, Queen Of Sorrow* kantatu zuen, mendebaldeko bere kantuak kantatu zituen, gero bakarrik geratu zen gitarrarekin eta kantatzen jarraitu zuen. Gogoan ditut haizea, ekaitza, basoa eta adarrak mugitzen. Eta behingoz zerbait gertatzen ari zitzaigula. Eta hunkigarria izan zela. Eta esaten zuen ia ezer ez genuela ulertzen, baina berdin zitzaigula. Gero kantuen hitzak irakurri genituen eta itzuli eta igerilekuak, jauziak, agurrak, begiradak, hiru argazki, auto bidaia bat, beste agur bat… aurkitu genituen. Baina garrantzitsua zena gertatua zen ordurako eta ez geunden ez zeruan ez infernuan, baizik eta beste leku batean, askoz urrunagokoa eta misteriotsuagoa, justu Berango amaieran eta Sopelara iritsi baino lehen, metro geltokiaren aurrean, orain eliza ebanjelikoa dela diote, oso barrutik kantatzen duen eta eliztarrak hunkitzen dituen artzain bizardun bat dagoela diote, laster lekuz aldatu eta haien bidearekin jarraituko dutela diote, mendebalderantz, beti mendebalderantz, zaldi basatiek egiten duten moduan.

6.
Hamalau urte igaro dira dagoeneko. Carlos aita izan berri da, txikiak Maia du izena eta orain mugatik oso hurbil bizi dira, Irunen. Luis ere aita izan da eta laster Martina bere aurreneko kontzertura eramango duela dio. Ni atzerriko hirietan bizi izan naiz, hainbat aldiz joan eta itzuli naiz. Egunotan beste etxe-aldaketa baterako prestatzen ari naiz. Aspaldi ez gara kontzertu berean elkartu.

Will Oldham azkenaldian Kelly Reichardten filmetan ikusi dugu, noraezean dabilen lagun tristearena egiten *Old Joy*-en (2006) eta eskalearena *Wendy and Lucy*-n (2008). Bere diskoak erosten eta entzuten jarraitzen dugu. Zenbait urte geroago Oñatin ikusi genuen berriz, orduko hartan Anarik lagundu zion eszenatokian.

Uste dut Luisek egin zuela argazkia: Carlos ezkerrean, Will erdian, ni beste aldean, hirurak kamerari begira. Orduan ez genekien geroago gertatuko zitzaigunetik ezer. Oraindik ez dakigu. Horixe da etorkizuna.

**VICTOR IRIARTE.** BILBO, 1976
Zinemagilea

## **UR GARDENAK** | AKAUZAZTE



Esan Ozenki, 1998

**BIZITZAREN ISLA**
Kristo aurreko VII. mende inguruan, mendebaldeko pentsamendu filosofikoaren hasieran, naturalistek (horrela deitzen zitzaien natura ikasgai zuten lehenengo filosofoei) errealitateari begiratzen zioten printzipio sortzailea, gauza guztien sortzailea, ezartzeko asmoz eta horrela *Arkhe* izendatu zuten.

Behaketa horretatik, Miletoko Talesek ondorioztatu zuen printzipio hori ura zela, gauzak bertatik datozelako, berari esker existitzen direlako eta bertara itzultzen direlako.

Logikoa zen Tales ondorio horretara heltzea, ura naturako elementu guztietan baitago, bizitzaren azken iturburu delako, eta izaera *totalizatzailea* eta ia jainkotiarra duelako.

Gure planeta ura da hiru laurdenetan, eta jantzi atomiko horrekin bizitza eta bere genesia ahalbidetu zuen, bertan lehenengo mikroorganismoak hartuz eta gizakiaren egitura genetikoaren % 71 urez betez.

Ura etengabe eraldatzen da aldaketa iraunkor eta atergabez, hainbat eratara gorpuzten da bizitzan; likidotan, birritan bainatu ezin garen ibaietan, elkar ikusten uzten ez gaituen lurrunetan, eta gure elixirrak atontzen dituen izotzetan.

Ura jariotzen da, narrasten da eta lurrean sartzen da, harkaitzik gogorrena higa dezake eta izaerarik latzena bigundu, heriotza da amorru basatizko olatu uholdetan, edo antzinako tortura tresna.

Tai gabe, etsi-etsian aritu da gizakia uraren bila, botiletan eta urtegietan giltzaperatu du, bere eztarritik behera eraman du, eta arazo bihurtu du, 2030. urtean 5 pertsonatik batek ur-eskasia izango baitu. Baina ura, ezer izatekotan, munduaren eta gure arimaren ispilu eta diagnosia da, orakulu hutsezina; egiatia da eta begirada itzultzen du.

Zenbaitetan, oso aldi bitxi eta bakanetan, musikan agertzen dira horrelako ur ispilu horiek, pitzadurarik gabekoak, tupustean azaltzen zaizkigu beti, edota hurbileko bati esker, gure psikea aztoratzen dute, shock egoeran jartzen dute. Epileptikoak.

Musikarekiko izan dudan esperientzia gaixogarri osoan zenbait musika ispilurekin egin dut topo, baina bat ere ez zait izan Akauzazteren 1998ko *Ur gardenak* bezain argia, bat ere ez dut bizi izan hori bezala.

Inflexio-puntu hura gogoratzeko, musika erreproduzitu eta burmuinarekin konektatu behar dut, osorik har nazan, harrapa nazan, tai gabe, erruki gabe; bertan bainatu behar dut, murgildu, ur horiek edan, ozeanoak zeharkatu denboran, nire oroitzapenen erdiraino igeri egin.

Eta uraren memoria infinitu horretatik, biluzik, begiak eta belarriak zabalik, data bat etorri zait burura, suaz grabatutako zenbaki batzuk....................... 2000ko apirilaren 14a; etereo, distantzia hartu dut, nire baitatik aldendu naiz, nire burua behartu dut, ehunka buru orbitanterekin batera, aleatorioki ezarriak eta estu-estuan areto osotik, gainera etorriko zaigun intentsitate-uholdea antzeman ezinik.

Dena hasi eta bukatu zen une berean, unibertsoaren moduan hamaika aldiz uzkurtzen eta zabaltzen atzapar zorrotzekin, nire gorputzaz hain azkar jabetuz, ezen zorabiatu nintzen, nahiz eta ahoa batetik bestera mugitzen zitzaidan harridura eta zoriontasun keinuak eginez.

Gogoan dut nire burua eszenatokiaren aurrean, eta itsaso amaigabe bat zegoela lau harea alerekin, ahalegin bizkorrean kristal handi bat osatzen zutenak, erabateko soinu ñabarduraz betea.

Aurretik inoiz ez bezala zabaldu zitzaizkidan erretinak eta belarriak, eta bere burua lehenbiziko aldiz ikusten duen umea izan nintzen, gauzen iragana, oraina eta geroa ikusi nituen. Lehenengo gizakia ikusi nuen, eskuak odolez zikinduta, hilzorian ilargiari oihu egiten zion animalia baten ondoan, totemak ikusi nituen, mitoak, zirkulu zentrokidetan ezarritako hezurrak, uluak entzun nituen leize baten hondotik.

Pertsona berbera ikusi nuen, beste garai hurbilago batean ezagutezin, aurrean batak eta zeroak zituela, lotuta, aulki batera kateatuta, lo antzera, gorputz osotik hedatzen ziren izpi katodikoetan urtuta, hutseraino.

Gauzen errealitatea ikusi nuen, zoriontsu izateko ezintasuna, itzulerak, desorekak, betirako nahigabea, eta balizko errezeta bat ikusi nuen, zarata, melodia, isiltasuna, ehundura urratzaileko erritmoak, argi eta itzalezko suak, patuaz eta une etengabeez mintzatzen ziren gitarrak, egun berriaren lanbroan desegiten ziren metalezko danborrak ikusi nituen, drogak, euliak ikusi nituen umeak jaten, poesia, sorkuntza, gordintasuna olio-poltsatan, errusiar mendiak...

Azkenean, begiratzen zidan ispilua nitaz jabetu zen, hegan atera nintzen eta dantza maltzur eta erritmodun bat dantzatuz ospatu nuen, totelka esnatu nintzen, izerdi patsetan eta ikusitako hartan erabat sinetsita, harridura aurpegiek inguratu ninduten, ezin ulertuz, ezer deszifratu izan ez balitz bezala, baina nik aditu egin nuen eta ez nuen utzi ihes egiten jendetzaren zirrikitu irekietatik.

Haren ondoren, sentsazio horren bila jarraitu dut, zainak zipriztindu zituen lobelarraren lehenengo sugarra berriro sentitu nahi duen yonkiaren gisara, eta ikuspegi berbera aurkitu dut beti, ez didate inoiz hutsik egin, eta beren diskoak diren substantzia kimikoak, enlatatuak, kartoian edo maketa zaharkitutan, aza-

lean itsatsi zaizkit. Izan ere, Akauzazte ikusi edo entzutea denak aurkako zentzu bat duela sentitzea da, bi aldetako esperientzia bat, errealitatearen argia eta itzala agerian uzten duena, metalezko zaldi baten gainean zamalkatzea, aurrerantz beti, ezagutu gabearen mugak zeharkatzea eta piztia erraldoiaren aurpegiari begiratzea, gu geu baikara piztia.

**GARIKOITZ MOYA.** SANTURTZI, 1980
Musikazalea

## [ 85 ]



## **BATZEN** | BETI MUGAN

Esan Ozenki, 1998

*“Futbolaz baino ez dakienak ez daki deus futbolaz ere.”*
*Sokrates*

### FUTBOLSOFI ALDAKETAK

Gola sartu zuen Joseba Llorentek. Horraino dena normal. Normal edo. Arrazoi duzue, ez da beste jokalari batzuk bezain, nola esan, estetikoa, baina logika diskurtsiboaren baitan sartzen da Joseba Llorentek gola egitea, hiesaren aurkako txertoa asmatzearen aldean behintzat. Elkarrekin jokatzen genuenean gol gehiago sartzen nituela esatea ez litzateke justua, bide batez, gezur borobila izateaz gain. Baina ez pentsa, nik ere izan dut idilio labur bat golarekin, beste batean kontatuko dizuet. Edo, itxaron, akaso ez da izango beste batik eta horra: Real Unionen jokatzen nuen urte hartan, aurrelari. Golik sartzen ez eta pixkanaka postua atzeratzen joan nintzen, punta erdi, atzeko erdilari, erdiko defentsa. Azken jardunaldian sartu nuen gol bakarra, zelai erditik. Irakaspena zein den? Auskalo, gure aurrelari segaila baloia hanketan bezala sentitzen naiz horrelakoetan.

Gola sartu zuen, beraz, Joseba Llorentek. Inguruko katalanak aldiz lasai antzean, bi goleko aldea zuen oraindik *Barsak*, hogei minutu baino ez ziren falta partida amaitzeko. Gola sartu, bat eta hiru, elastiko horia altxa eta, urteak betetzen dituen izeba zoriontzeko mezua espero nuenean, harrapazank, olagarro bat, edo begi bat, edo begi bakarreko olagarro bat. Eta bi hitz: Beti Mugan.

Hara, musikaz hitz egin nahi eta futbolarekin hasi. Zaila da garaiari izkin egitea, denok ez gara Messi bezain abilak. Ez dut esango ahaztua nuenik, ez dut esango memoria selektiboaren albo kalte zenik, baina momentu hartantxe ez nuen presente Beti Mugan. Gaztaroa bezala, akaso, seme bat ohean, alaba bat bidean, zera prosaikoagoak nituen buru estu honetan. Beti Mugan eta gaztaroa, inkontzienteki elkartu dira hemen ere, ez alferrik gaztaroko soinu izan nuelako banda. Ez bakarra, noski, baziren talde gehiago. Gogoan dut hamalau urterekin Dut deskubritu genuenekoa, eszena ezin *rural-kitsch*-agoan: lagunaren base-

rrian, porroak erretzen, sagardoa edaten, eta nola isilik, zupadak gorabehera, irentsi genuen Duten estreinako hura, hasi eta buka. Baina Dut esperientzia hondo sanoagoa izan da.

Beti Muganez ari ginen, musikaz edo. 98an atera zen *Batzen*, taldearen ia abesti guztiak biltzen dituen lana. Esango nuke, erosi nien lehen diskoa izan zela eta bakarra. Ordurako buruz nekizkien baina kantu guztiak, ez galdetu nola, ez dut gogoratzen kontzerturik, ez dut gogoratzen kaseterik, baina guzti-guztiak ezagutzen nituen. Pentsatzen dut, nahi gabe ere, idorreko haizea sartzen zitzaigun bezala sartu zitzaizkigula kanta horiek ere, tontamentean.

Azken batean ez da hain aldrebesa, geografia bat partekatzen genuen, kantu haiek eta guk, guk eta banda hark. Belaun bat zaharrago ziren taldekideak, baina oso gertuko jendea, lagun minaren anaia zen gitarra bat, zenbat ordu pasako nituen haien etxean, kontsolatzen, zenbat aldiz ikusi nuen hirugarren anaia bat, gaur futbol talde garrantzitsu bateko entrenatzaile (hankapilota *forever*), garai hartan jokalari, lesioak konpontzeko maxinekin. Kantantea bera, bizilagun, nola ahaztu etxe azpiko zelaitxoan, berak jakin gabe, eskaintzen zizkidan topless saioak, paradisua lurrean ere existitzen den frogarik behinenak. Bagenekien aita ETAk hil ziola, gauza jakina zen, baina inork inoiz ez digu ezer gehiago esan, guk ezer galdetu ere ez, noski, nola bada, eta murmurio antzeko batzuk baino ez zaizkit geratu, ganbelua zela, EAkoa. Auskalo. Semeak behintzat, alaba ez dakit, ikastolara joaten ziren, edo etortzen. Eta ez dakit datu horrek zerbait esan nahi duen. Geografia bat partekatu arren beti ez baitu jotzen idorreko haizeak.

98an atera zen *Batzen*. Ez dakit zenbat aldiz entzungo nuen diskoa, entzuna nuen ordurako, ez galdetu non, ez dut gogoratzen eta. Gainera zerbait bukatu zen urte hartan, herria uzteko ordua iritsi zen, unibertsitatera joatekoa, hiri berri bat, jende berri bat, musika banda berri bat. *Futbolsofi* aldaketak, hitz gutxitan esanda, handik aurrera Jack Kerouac irakurri genuen, mugak daudela konprobatu, eta ez sobera urruti, gizona gizonarentzat (eta emakumearentzat) otso dela, zure odola edatearena, tira, nola esan, nahiago *kokakola light*.

*Barsak* laugarren gol bat sartu zuen handik gutxira, eta garaipen argiarekin bukatu zen partida. Gerora jakin nuen zergatik luzatu zuen kamiseta hura Llorentek, Beti Mugan berriz bueltatzekoa zen eszenatokietara, Irunen, azken aukera akaso. Eta, katalanez inguratuta aspaldian, ezin izan nuen kontzertura joan. Orain berotan ez dakit nahiko nukeen ere, gauza ugari mugituko ziren estomakan, ez dakit aurrez aurre ikusi nahiko nukeen jada hain gazteak ez garela. Agian hobe horiek denak dauden lekuan, oroitzapenentzako errausterik ezean, ondo lur azpian.

**ARITZ GALARRAGA.** HONDARRIBIA, 1980
Musikazalea

[ 86 ]



## **GOOD MORNING SPIDER** | SPARKLEHORSE

Capitol,1988

Mark Linkousek 2010ean utzi gintuen, beti bigarren maila lasai batean pasatu zuen ibilbide labur baina bikaina egin ostean, izen handietatik urrun, baina kritikak nahiz Tom Waits, Daniel Johnston, PJ Harvey eta beste artista askok miretsia, ez baitzuten zalantzarik izan Sparklehorse izenarekin izenpetzen zituen diskoak osatzen zituzten sehaska kantu inperfektu baina zoragarrietan aterpe hartzeko.

*Good Morning Spider* bere bigarren lana da; Linkousek bere beldur, ikara eta egonezin guztiak irauli zituen anomalia zoragarri honetan, hainbat gogo-aldartetatik pasatu ondoren lortutako txatalak diruditenetatik sortutako diskoa eratu baitzuen. Hain zuzen ere, diskoaren baliorik handiena txatal izate horretan datza, jatorri ezberdineko ebakin izate horretan, horrek dakarren inperfekzio eta irregulartasunean.

*Play* tekla sakatzen dugunetik, argi geratzen da ez dela izango entzule guztiei gustatuko zaien lana. Diskoa bere kanturik onenetakoa izango zenarekin hasi beharrean, *Painbirds* itzela, bigarren lerroan jartzen du eta entzuten dugun lehena *Pig* da, ostiko bat hankartean Sparklehorsen munduan sartzeko *Good Morning Spider*-era kuriositatez hurbiltzen den edozeinentzat.

Lehenengo hartu-eman hau nahasgarria bada ere, Linkousek nolanahi ere utzitako ondarerik onena belusez dotore bilduta dator, eta bere kantarik zakarrenetan iraultzen dituen amorrua eta frustrazioa alde batera uzten dituenean eskaintzen digu Linkousek bere alderik onena. Kantu ederrak, esaterako, *Saint Mary* hunkigarria, ingresatuta egon zen ospitaleari eskainitakoa (bere buruaz beste egiteko saiakera baten ondoren egon zen bertan –denboraldi batez gurpil-aulki bati lotuta utzi zuen saiakerak–); Daniel Johnston beste *outsider* horren bertsio ederra (*Hey, Joe*), *Sunshine* hildako Vic Chesnuttek lagunduta… edo azken finean *Good Morning Spider*-eko nire kantu gogokoenak eta bere ibilbideko kantu delikatu eta politenetako bi direnak (*polita* guztiz nokeatuta uzten zaituen hori izanik, esku artean duzuna uztera behartzen zaituena zure zentzumen guztiak kantari eskaintzeko), *Maria´s Little Elbows*, eta *Hundreds of Sparrows* hunkigarria, Sparklehorseren musikan hain presente dagoen dikotomiaren adibide ezin hobeak eta Mark Linkousen burutik pasatzen zenaren isla ere badela uste dut, kantarik zirraragarriena sortu eta oparitzeko gai zen tipo bat, baina baita “mundu triste eta eder” –hala zioen bere debutean– honi agur esateko gai ere bazena, bularrean tiro bat eginda.

Funtsean, Sparklehorseren musika atentzioa deitzeko modu bat izan da beti, nire ustez, edo, zergatik ez, laguntza eskaera larri bat, mundu honetan bere lekua aurkitzen ez zuen pertsona batena. Lehen diskoaren aurreneko kantuan batailan hiltzear den Rikardo III.a aipatzea nahikoa esanguratsua iruditzen zait zentzu horretan (“*Zaldi bat, nire erreinua zaldi baten truke*”

da Linkousen ahotsean entzuten dugun lehena bere aurreneko lanaren –*Vivadixiesubmarinetransmissionplot*– hasieran). Baina kuriosoena da agonia horri modu latz edo eskuraezinagoan ihesbidea eman beharrean, Sparklehorse taldearen kantuek urrumatu eta beroa ematen dizutela, beren unerik delikatuenek transmititzen duten berotasunarekin eta Linkousen ahots xuxurlariarekin biltzen zaituztela. *Saint Mary, Come on In, Junebug* edo *Good Morning Spider* osatzen duten gainerako kanta zoragarriak entzutea baltsamo sendagarri bat bezalakoa da, inguratzen gaituen mundutik desintoxikatzeko terapia, tamalez, guk nahi genukeena baino pertsona gehiagok, Linkousek bezala, uzteko ezin eutsizko beharra sentitzen duten mundu hori.

**JUANRA PRADO.** BEASAIN-DONOSTIA, 1976
Musika argitaratzailea
moonpalacerecords.com





## **AS IF BY REMOTE** | LADDIO BOLOCKO

Hungarian Records, 1999

**OSTATUA IXTEKO MUSIKA**

Ba omen dira zenbait musika tabernak ixteko egokiak direnak. Zeinek ez dio noizbait erran tabernariari “ostatua itxi nahi duk edo?” musika ustez lasaiegia jarri duelarik. Taberna batzuetan, gainera, ageri da nahita egiten dutela hori, jendea bidaltzeko. Mikel Laboaren *Izarren hautsa* jartzea jendea eskobarekin jotzea baino eraginkorragoa izan daiteke goizeko hiruretan. Ez beti, ordea. Aski da norbaitek letra ezagutu eta emozionatzea, guztiz kontrako efektua egiteko. Orduan, akabo!

Bertze zenbait kasutan, berriz, abesti zehatz bat jartzea ostatua itxi behar duten seinale izaten da, Iruñeko Txukindenen jartzen zuten abesti xelebre hura bezala, lehen notak entzun bezain laster jendea ostatua husten hasten baitzen, eta abestia burutik ezin kendurik, hurrengo tabernarako bidea txistuka egiten zuten denek batera, sinfonia ibiltarian.

Baina zer gertatzen da tabernak itxi eta gero? Musika kendu eta ixiltasunaz gozatzen gelditzen ote dira kamarereoak?

Bertzeek eztakit zer eginen duten, nik nirea kontatuko dut:

Demagun ostiral gaua dela, goizaldeko 4ak. Gau osoan zerbezak ateratzen ari ondotik, azkenean bidali ditut azkeneko bezero mozkorrak. Ederki kostata bidali ere. Ateak eta leihoak itxi ditut. Ezker-eskuin begiratu eta ostatua hutsik. Azkenean...

Atorraren maukak bildu eta hondarreko lanak egiteko prestatu naiz; kafetera garbitu, edalontzi hutsak bildu, dirua kontatu, eskoba pasatu, makinak itzali... gaueroko lanak. Orain dela minutu eskasa oihuak eta begiak zeuden tokian, ixiltasuna eta hutsa. Ederra bakea. Lan egunaren bukaerako nekea, kea, betiko jendea eta betiko solasak buruan burrunbaka, taka, taka, taka... eta hori guzia lehenbailehen erantzi eta etxera joateko gogoa.

Gaueko azken zigarroa bildu bitartean pantailaren parean jarri naiz, musika karpetak bilatu ditut; reggae, folk, pop, munduko musikak, rock... gau osoan karpeta horietan bilaka aritu naiz jendearen gustuko musika jartzeko. Baita nere gustukoak ere, noski. Baina bada disko bat denek alde egiten dutenerako gordetzen dudana. Momentu honetarako, alegia. Ttikitan goxoki bat ematen zigutenean eta denen aurren jan beharrean, sakelan geroko gordetzen genuenean bezala, bakardadean dastatzeko.

Rock... Laddio Bolocko... *As If By Remote*... play!... eta piztu dut zigarroa.

Soinu-mahaiaren gurpiltxoa hartu dut bi behatzen artean eta pixkanaka bolumena igotzen hasi naiz. Kun-kukun, kun-ku-kun... hasi dira lehen bateria kolpeak xuabe-xuabe... Kun-ku-kun, kun-ku-kun... ozenago... Kun-kukun, kun-ku-kun... oraindik ozenago... kun-ku-kun, tukun-ku-kun... segundo batez begiak itxi ditut, arnasa sakon hartu eta hasperena eginez atera naiz mostradoretik. Ezinegon puntu bat ematen du horrelako bolumenarekin ostatua hutsik ikusteak.

Aulkiak igo ditut mahaietara
kun-ku-kun, kun-ku-kun
eskoba hartu dut
kun-ku-kun, tukun-ku-kun
zigarrokinak, paperezko serbilletak, palilloak, hautsa... egun guztiko bezeroen arrastoak multzo batean pilatzen joan naiz... eta bitartean belarrietatik
kun-ku-kun, kun-ku-kun
baltsamo bat bezala
kun-ku-kun, tukun-ku-kun
eta bat-batean saxo uholdea
poroboroboroborobooooooooooooooo

bizkarraldean hotzikara eragin dit
poroboroboroborobooooooooooooooo
irri ttikia ezpainetan, azkarrago eragin diot eskobari
kun-ku-kun, kun-ku-kun, kun-ku-kun, tukun-ku-kun

**ASIER GOGORTZA.** BERA, 1976
Musikazalea
asiergogortza.net

[ 88 ]

## **THE FIDELITY WARS** | HEFNER



Too Pure, 1999

Nire maitalea ote zen galdetu ohi zenidan barrez. Lanetik bueltan etxera heltzen zinenean harekin topatzen ninduzula askotan. Nik ere barre egiten nuen zurekin batera, a ze tontoa, edo antzekoren bat esanda. Eta musika aparatuaren bolumena jaisten nuen, apur bat lotsatuta. Egia esan, zuk uste baino gehiagotan entzuten nuen Hefner. Gehienetan, zu itzuli baino lehentxeago bueltatu ohi nuen CDaren kaxa armairura, urduri, lapurren erara, aztarna oro desagerrarazi nahian. Are deserosoagoa zitzaidan gogoratzea zeuk aurkeztu zenidala haien musika. Zeuri esker iritsia nintzen Darren Haymanengana, eta horrek larriagotu egiten zuen traizioa. Aitortu dezadan egia: autoan ere entzuten nuen, ikastarotik bueltan. Bolumena askotxo igo behar izaten nuen azalpenezko intro xuabeak entzuteko —zorionekoak motor zaratatsuko auto zaharrak!—, eta klimax erabatekoan amaitzen



nuen, ahots betean aldarrikatuz neuk ere maite nuela neskak nire ohean erretzen ikustea. Zure aurrean itxurak egiten saiatzen nintzen. Nola azaldu bihotza gelditu egiten zitzaidala "*I don't want to stay in love*" esaldiaren osteko bat-bateko isiltasunean? Nola ulertarazi Darren Haymanen eta bion arteko kidetasun kosmikoa? Are gehiago, nola aditzera eman, nire zintzotasuna zure aurrean txiki-txiki eginda utzi gabe, arnasa estutu egiten zitzaidala diskoaren hasierako "*one…two…one, two, three, four*" entzun bitartean? Desleialtasun zitalagorik!

Zarautzera ere joan ginen, Hefnerkideak ordurako banatuak zirela, Darren Hayman beste bi musikarirekin jotzen ikustera, eta han ere adar-jotze bera egin zenuen. Isabelen maitalea ikustera etorri gara. Eta Forkiren ulertezintasunari erantzunez: etxera itzultzen naizen guztietan harekin harrapatzen dut. Barre txikia egin genuen hirurok. Eta gero, kontzertua entzun bitartean, neu izan nintzen, itxurazko axolagabekeriaz eta zirtolari, ahoa zure belarrira hurbildu eta txantxa egin behar izan zuena. Jesus, gizon hau institutu garaian ez zen ba gelako popularrena izango. Udalekuetan nahikotxotan ipiniko zioten honi hortzetako pasta begietan, lo zegoela. Une horretan "*I love no one else, I love only you*"-ka ari zen Darren, eta bihotza zikin sentitu nuen.
Duela aste batzuk, autoan gindoazela, *Kafe aleak* libururako zer disko aukeratuko nuen galdetu zenidan. Eskua abiadura-palankara hurbildu nuen, eta bolantera itzuli nuen berehala, martxa aldatu ere gabe. Ez dakit ba. Eta isiltasun baten ostean: Hefnerren bat igual. Darren guapoaren taldea?, galdetu zenidan. Barre txikia egin nuen. Beste behin. Ze disko? Ez nago ziur. Atzerako ispilura eraman nuen begirada. *The Fidelity Wars* igual. Eta gero, neure baitarako: jakina.

**ISABEL ETXEBERRIA RAMÍREZ.** DONOSTIA, 1975
Musikazalea

[ 89 ]

## **MI FRACASO PERSONAL** | ASTRUD



Chewaka, 1999

**Esta cosa de cantar canciones, así en abstracto…**
Telebistan ikusi nuen Astrud lehen aldiz, zehazki *Lo+Plus* programan. *Bailando* ari ziren kantatzen, ordurako ezaguna nuen *hit*-a. Eurak biak, ez nuen sekula antzeko ezer ikusi. Hamahiru urte nituen eta neure buruaren bilaketan hasten ari nintzen. *Queer*-ari egindako edozein erreferentziak harrapatzen ninduen, *queer*-aren kontu hori zer zen jakin baino lehenagotik ere… Baina eurak biak… Bata mutil onaren, ikastunaren, munduko irain guztiak jasotzearen itxurarekin: pastadun betaurreko oso handiak, gizon nagusiaren arropa, goraino lotutako alkandora. Bestea teklatuan, argal-argala, ile laburra, halako itxura bohemioa… eta takoiak. Ez nuen ezer ulertu. Paradisio taldearen bertsio bat egiten ari ziren. Izena gorde nuen buruan, Astrud, eta aurkezten ari ziren diskoarena, *Mi fracaso personal*. Guztia zuten. Zeri buruz hitz egingo zuten kantek? Interneten aurreko garaian, nirea bezalako hiri batean, ia ezinezkoa zen horrelako disko bat lortzea.

**Reconozco que como oyentes no os falta voluntad…**
Eroski, 1999ko egun bat. Mecanoren fana nintzen, funtsean, baina bilatzen jarraitzen nuen. Diskoen apalean begiratzen ari nintzela, orduan leku handia betetzen baitzuten oraindik hipermerkatuetan, bat-batean ikusi egin nuen. Bi pertsonaia ardo edalontzi bati eusten, isurtzen?, atzealde urdin argiarekin, ereinotz koroa zilarreztatu batean sartuta, eta zilarrezko hizki horietan: ASTRUD MI FRACASO PERSONAL. Aurkitu dut. Takoien tipoa da. *Tres años harto, El amor era esto, Cambio de idea, Bailando*… Bai, hauxe da.

**Y no quiero ocultar que siempre hubo un matiz o la sombra de una duda…**
Kilima nerabe eta pobrezia teknologikoko une haietan, soilik erabil nezakeen CD irakurgailua adinekoei salgarri den guztia saltzera bideratutako txango horietako baten ostean gure aitonari enkasketatutako musika-kate itzelean, amua irentsi zuen, baina niri ez zitzaidan gehiegi axola izan, etxean sartzen zen aurreneko CD irakurgailua zelako, iraultza handia. Hala ere, musikalki, walkman batekin hustu behar nuen barrena. Zinta batean grabatu nuen *Mi fracaso personal, Bailando* kaseteko lehen kanta izan zedin zainduz, entzuteko beharra banuen erraz aurkitu ahal izateko. Baina jakina, soinu collageak tranpa izan zuen beti, eta azkenean beti bukatzen zenuen zintako lehen kantak entzun eta birbobinatzen, trabatu eta hondatu arte. *Bailando*-k oraindik hunkitzen ninduen, entzunaldi bakoitzean haren alde ezkutuez jabetzen nintzen; "*Erección*" esan du? baina gainerakoak… Gainerakoak izugarri aspertzen ninduen, ez nuen ulertzen. Ez nuen hitz bihurri haietan bilatzen ari nintzena aurkitzen, ez zegoen ezer homosexualik hor. Esaldi solteek grazia egiten zidaten; "*Hay demasiada cafeína en mi torrente sanguíneo*", baina kito. Agian, guztiarekin ere, herri txiki bateko nerabe bat ez zegoen prestatuta Astruden disko baterako.

**Y era tan solo cuestión de tiempo que nos desbordaran los acontecimientos…**
Ulertzen ez nuen disko bat gordetzen zuen kasete zinta bat nuen, eta disko hori ziurrenik nire gelako izkinaren batean ahaztuta bukatuko zuen CD batean zegoen. Hala ere, eta ez dakit zein mugimendu kosmiko bitxirengatik, Manáren fana zen institutuko neska bati utzi nion CDa. Zergatik egin nuen? Zein ziren nik ezagutzen ez nituen baina berak mailegua onartzeko bezain ondo saldu nituen bertuteak? Ideiarik ez. Hala ere, disko hori berari uztearen zuhurtzia falta izan nuen (orain badakit zuhurtzia falta izan zela). Eta bere eskuetan egon zen, hainbat hilabetez. Hilabete horietan diskoa ahaztu nuen, egun batez itzuli zidan arte. Marra bat zuen kutxan. Baina niregana itzuli zen.

**¿Y si cambio de idea sobre ti?**
Denbora nahikotxo pasatu zen, ikaragarri aldatu zen nire bizitza. Mende berria hemen zen, nire disko bilduma xumeki handitua zen eta nik egunero egiten nuen amets biboteak *indie*-aren giro txikian sartzearekin. Bakartasun probintzianoaren urruntasunetik begiratzen nuen giro *indie*-an. Interneten nabigatzen nuen herriko ziberrean diru nahiko xahutzearen truke. CDren bat erosten nuen saltoki-guneko disko dendan. Pepsik diruz lagundutako musika alternatiboko aldizkari bat ikuskatzen nuen.

**Voy a pensar aún más en ti y a no olvidarme de no dejar de recordarte.**
Eta edozein urte gatzgabeko edozein egun gatzgabetan, arrazoi jakinik gabe, salbu eta, agian, taldearen izena ezagun egiten zitzaidala, bigarren diskoa (*Gran fuerza*) erosi nuenean, *Mi fracaso personal*-en handitasuna deskubritu nuen. Erosi nuenean diskoaz gozatzea eragotzi zidaten murru guztiak erori balira bezala izan zen. Landare igokariz, loretan zeuden landarez, fruitu mamitsuz eta urtsuz, ardoz eta ereinotzez betetako lorategian nengoen orain. Bakanal baten erdian nintzen, Dionisok nigandik hurbil egiten zuen korrika eta Astrudek jartzen zuen soinu banda.

Astrudek ate oso garrantzitsua ireki zuen nire munduan. Ezezagunari eta ezberdinari nion beldurra kendu zidan. Desberdin izateari beldurrik ez edukitzea lortu zuten, baizik eta horretaz harro sentitzea, horixe izatea nire identitate marka. Gauza konplikatuetan miatzen, gauza liluragarriak deskubritzeko pazientzia izaten. *Mi fracaso personal* ez dator bat izenburuarekin, diskora izenburuagatik heldu banintzen ere. Eurek gauza asko egin zituzten gero, nik disko asko erosi nituen gero, baina hau eta ireki zuen ebakia ordezkaezin dira.

Astruden diskoa hasieratzat jo daiteke. Espainiako musika alternatiboaren etapa berri baten hasiera. 90eko hamarkadan bizi zuten ingelesezko noise eztandaren eta 2000tik aurrerako gaztelaniazko *indie-poparen* arteko lotura. *Indie* musika delakoak ordezkatzen dituen filia eta fobia guztiak piztu zituen Astrudek disko honekin. Alde batetik, hitz korapilatsuak, petulanteak, intelektualoideak, gazteria hedonistari, beste edozertaz arduratzeko bere buruaz arduratuegi zegoen gazteriari egindako keinuak ulertuko dituzten hautatu gutxi batzuen eskura. Bestetik, nahi duten bezala jokatzeko eta izateko ausardia, pedantetzat hartuak izateko ausartak, eta aldi berean Paradisio bertsionatzeko eta kantak takoidun

zapatetan interpretatzeko bezain *petardak*, Magnetic Fields, Pulp, Astrud Gilberto errebindikatzeko, 6ths edo Chico y Chica. Lehenengo LP honen ostean, bikote kataluniarrak bide ezberdina hartu zuen, apurka-apurka barrokismo popetik urrundu zen, eta musika herrikoiari heldu zion bere ikuspegi propio eta oso pertsonaletik. Hitz konplexuek batez ere hirugarren diskotik aurrera beren lanean nagusituko zen kostunbrismoari utzi zioten lekua; sinteek hari-musikari eta zarrabeteari eta antzeko musika-tresna tradizionalei. Astrud asko aldatu dira, eta ni haiekin; izan ere, sakonean, *somos lo peor*.

**ANDREA GALAXINA.** SANTANDER, 1986
Fanzine editorea
bombasparadesayunar.blogspot.com.es

**[ 90 ]**

## **THE FRAGILE** | NINE INCH NAILS



Interscope Records, 1999

Ez naiz sekula izan izenak, zigiluak, diskoak edota edizio urteak buruz ikasiz gozatzen duten horietako bat. Gauza bera esan dezaket 1981eko Realeko jokalarien zerrendaz. Biek ala biek garrantzi berbera dute niretzat. Hala ere, futbolari buruzko daturik gogoan gordeko ez dudala ondo dakidan arren, ez zait hala gertatzen musikarekin. Oharkabean izen bat, hitz bat edo melodia bat ezagutzen dudanean, memorian grabatuta geratu ohi zait ezinbestean.

Ez dut gogoan noiz entzun nuen NIN lehenengoz, baina ordutik palindromo txiki horrek lekutxoa du nire lehentasun musikalen artean.

Bost urteko isilunearen ondoren, Trent Reznorrek 1999an *The Fragile* argitaratu zuenean, kritikariak eta jarraitzaileak bat zetozen itxarotea merezi izan zuela. *The Downward Spiral* diskoak langa goi-goian utzi zuen arren, laugarren lan honek ez zuen kale egin. 23 kantu, bi CDtan banatuta, *Left* eta *Right*, hasieratik bukaerara entzunez gero infernu gorriaren mugetara eramaten zaituztenak, erabateko barealdietatik pasatuz, azkenean egoera ilun-ilunetara heltzeko, konposizio osoari edertasun bitxia emanez.

Reznorren beraren hitzetan, konposizioa, konponketak, ekoizpena eta soinuaren diseinua gauza bat eta bakarra balitz bezala hartuz sortu zen *The Fragile*. Eta oso nabarmena da hori. Koherentzia ikaragarria du lan osoak. Konposizio bikain hau osatzeko, teknikak, estiloak, oihuak, marmarrak, distortsioa, zarata, harmoniak, disonantziak, erritmoak, progresioa, errepikapenak eta ehundurak maisuki kohesionatzen dira gitarra, baxu, bateria, biolin, kontrabaxu, txelo, piano, bibrafono, ukelele, slide-gitarraren notez eta nabardura elektronikoz jositako hainbat eta hainbat geruzatan, gainera, Trent Reznorren ahots bereziaz hornituta.

Bartzelonan hasi zen *The Fragile* diskoaren bira, 1999ko azaroaren 14an, eta ni bertan nengoen. Egia esatera, lehenengo minutuak nahasgarriak izan ziren. *Rockeroegi* entzuten zen dena eta nik bilatzen nituen soinuak ez ziren inondik agertzen. Bigarren abestirako, ordea, ez nuen ezer sumatzen faltan. Noski, entzuten ari nintzena ez zen diskoa, baina bost axola. Berriro ere NINek harrituta nindukan. Eszenaratzeak nire aurreikuspen guztiak gainditu zituen. Reznorrek kanta bat bestearen atzetik jaurtitzen zigun, eta aurrez aurre geundenok ez genuen detaile bat bera ere pasatzen utzi nahi. Ikus-entzunezko muntaiak hainbat planotan hartzen zuen eszena, eta horrek, musikarien kalitatearekin eta argiztapen zehatzarekin batera, ikuskizun bikaina eraiki zuen. 565 kilometrok eta 3.800 pezetak eraman ninduten haraino, eta bueltan memorian gordetzen dudan kontzerturik onenetako bat ekarri nuen.

Zalantzarik gabe, Trent Reznorrek dena izan du esku-eskura industriaren produktu huts bat gehiago izateko. Eszenaren *divo* bihurtu nahi zuten: gaztea, bihurria eta famatua, depresioa, drogak eta heriotzaz inguratutako iragan zaila bizkarrean. Baina berriro ere, Reznorrek gehiagotan erakutsi duen koherentziaz eta zuzentasunaz, ateaz aurpegian eman zion *mainstream* osoari. Bere kontzertuetan bere musika lapur dezatela eskatzen du, oparitzeko eta lapurtzen jarraitzeko, bere azken bi diskoak Creative Commons lizentziapean argitaratu ditu eta modu independentean lan egiten du, diskoetxerik gabe.

Berari buruz esan izan da bere garaiari aurrea hartu ziola eta inoizko 100 artistarik onenetako bat dela. Nik bakarrik esango dut jenio hutsa dela eta *The Fragile* NINek oparitzen digun jenialtasuna dela. Bizitzan inork gal ezin dezakeen bidaia. Eser zaitez, igo bolumena eta itxi begiak. Horixe da oraintxe bertan behar duzuna.

*Oharra: 1981ean Realak Liga irabazi omen zuen lehenengo aldiz bere historian.*

**IMA PARALUX.** CARACAS, 1965
Bideogilea
seriesnegras.org



**[ 91 ]**

## **SPANISH DANCE TROUPE** | GORKY´S ZYGOTIC MYNCI



Mantra Records, 1999

Hantxe bertan nengoen ni, argazki lauso bat, Cortázarren testu bat eta Gorky's Zygotic Mynciren diskoa aldean nituela.

Aurrean, jendetza sarrerako atean pilatuta, eta ikara sortzen zuen isiltasuna. Emakume bakartiak kapela arraroak jantzita, gizonak propio dotoretuta. Ehunka bikote zeuden, aurpegia hainbat gauk eta malkok zimurtutakoak. Batzuek elkarri heltzen zioten eskutik, arinki, begirada galduta. Beste batzuek elkar saihesten zuten, besterik gabe. Pertsona izandako mamuak zeuden, eta mamu baino ez ziren pertsonak.

Nola eraman ez zen kontu hutsala. Askok paper marruskatutan zeramatzaten idatzita, denborak eta oinazeak zimurtuta. Beste batzuek kartoizko kutxa kokorroilduak zamatzen zituzten, ondo itxita zinta isolatzailez, ez zedin bat ere galdu bidetik. Guztien erdian, agure konkor bat, musika-kutxa zahar bati arreta handiz eusten, noizbehinka erdi irekiz eta begiratuz, neguko ilunabarretan hark jartzen zion tango hura marmarrean kantatuz. Gero pixkanaka ixten zuen, zaratarik egin gabe eta enegarren aldiz agurtzen saiatzen zen. Oroitzapen batzuek sua bailiran erretzen dute.

Cortázarren testuak, argazki lausoak edo Gorky´s Zygotic Mynciren diskoak bezala: Mexikon bizi izandako 6 hilabete haiek. Hegoalde zaharrak, izan baziren argiak. Gainetik betiko atera nahi nituen oroitzapenak.

Disko hura, *Spanish Dance Troupe, Hallway*-ren samurtasun psikodelikoarekin hasten zen, Chapultepecetik paseo amaiezinak egiteko eta beti garaiz heltzen ziren gutunetarako soinu banda. Handik desfilatzen ziren *She Lives on a Mountain*-eko tronpeta dirdiratsuak edota *Over and Out*-eko minimalismo magikoa ere, Zapata Metroko kabina zahartuan alegiazko itxaron-gela izan ziren kantuak. Telefonoaren bestaldean, ia munduaren beste aldean, zoriontasun-balak jaurtitzen zituzten promesak. *Desolation Blues*-eko erotasun pesimista taupakariak, eta lumaz egindako konponketa nahaspilak ere, *unigorputz* garaiak eta bizitza zoriontsuak besterik ez zuten iragartzen.

*Faraway Eyes*-eko kutsu countrya bere begi urrunak ziren Xochimilcoko argazki lauso hartan, eta *Murder Ballad*-en erdi aroko malenkonia Cortázarren ipuin hura musikaz hornitzen zuen memoria atzaparkada bat. Ahots dardartiz egunsenti batez irakurri zidan huraxe. Biok nahi genuen Axoltl izan. Eta musikari galestar haien karabana berean sartu gnomo eta druidaz mozorrotuta, euriaz nazka eginda dena uzten zuten horiek Espainian barrena ibiltzeko *Spanish Dance Troupe*-arekin. Bilbotik Madrileraino. Ardoa edan eta Maria ederra ezagutzeko, harekin dantza egiteko. Zoriontsu izateko.

---------------------

*Disko hau sei hilabete izan ziren Mexikon, argazki lauso bat, Cortázarren testu bat... Baina oroitzapenak ezabatzea ez da lan makala. Esan diezaiotela Joel eta Clementinari (kapela arraroak zeramatzaten emakumeak), gizon dotoretuei, aurpegia negarrak zimurtutako bikote horiei. Oroitzapenak isilean ematen dira, listua irentsiaz. Eta behin utzi dituzula, buelta ematen duzu, nahasia oraindik, ilunpetik ateratzen, berriro hasten zara amets egiten.*

*Usaina burko laranja batean, hortzetako eskuila bat, Sr. Chinarroren disko bat. Hegoalde berriak, izan badiren argiak.*

**LUIS ARROSPIDE.** DONOSTIA, 1977
Blogaria
ezlekuek.wordpress.com

**[ 92 ]**

## **EN FAMILIA** | VAINICA DOBLE



Elefant Records, 2000

Vainica Dobleren jarraitzaileak ez gara ugari, baina bai, ordea, oso sutsuak. Oparia da, zorte handia guretzat, Carmen Santonja eta Gloria Van Aerssenen kantuek ukitu eta hunkitu izana. Askok, lehenbizikoz entzutean, hori zer arraio ote den esaten dute. Zaharkitua, aflamenkatua, arraroa eta nik dakita zenbat gauza iruditzen zaie.

Asko dago esateko Vainicari buruz, ihes egiten didan hainbat gauza. Eta musika eta kultura popularrari buruzko ikasketak serioago hartuko balira, haiei buruzko doktore-tesia egin lezake baten batek. Nik taldearen meritu nagusitzat hartzen ditudanak aipatuko ditut soilik: joera eta talde garaikideekiko independentzia erradikala; hitzetan pop eta rockean ordura arte jorratu gabeko gaiak (adibidez, amatasuna, haurrak, animaliak, eguneroko bizitza); femenino antzeman daitekeen ikuspuntua, baina estereotipoetatik lekutara dagoena; eta, batez ere, unibertso propio, berezi, original-originala sortu izana, amaraun baten moduan harrapatzen zaituena, eta bertatik irteteko gogoa kenduko dizuna.

Doktore-tesirik ez egon arren, egon badago Vainica Dobleri buruzko liburu bat, Fernando Márquezek idatzia 1982an. Liburuko atal batean bikotearen zaleek idatzitako testu laburrak biltzen dira, eta bertan Vainicaren musikarekiko harremanari buruz aritzen direnean gehien errepikatzen diren ideiak “bat-bateko maitemina” edo “maitasun istorioa” dira. Azken hori definitzen saiatzen direnean, “samurtasun kritikoaz” aritzen dira, xalotasun eta maltzurkeriaren arteko nahasketaz, hitzen poetikaz, abestien egituren originaltasunaz eta ahotsen harmoniaz, eta azkenik, Carmen eta Gloriaz ari direnean “sorgin” eta “maitagarri” hitzak dira errepikatuenak, baina ez pentsa zentzu peioratiboan diotenik, gogoratu zaleak direla.

Hori guztia zen eta da Vainica, eta kontuan izan laudorio horiek idatzi zirela azken hiru diskoak argitaratu aurretik: *Taquicardia, Carbono 14* eta *En familia*. Ez dira beren diskorik onenak, baina Vainicaren diskoak dira. *Carbono 14* (1997), zehazki, diskografia osoko eskasena dela esan ohi da, bereziki ekoizpen kaskarragatik, baina hala ere, nabarmenduko nuke txarrena izanda ere, abesti bikainak biltzen dituela. Pot eginda geratu ziren disko horrekin, diskoetxeak ziria sartu zielako sentipena zuten, eta hiru urte geroago, berriro grabatu zuten baina kantuak nahierara egiteko askatasun osoa eman zien diskoetxe batekin: Elefant Records. 2000. urtean ikusi zuen argia *En familia* diskoak, Carmen gaixorik zela. Eta agur usaina dario, heriotza inguratzen duen memoriaren intentsitatea, bizitza osoari gainbegiratua.

En familia du izena: ekoizpena eta konponketak Gloriaren seme Álvaro de Cárdenasek eginak dira. Laura de Cárdenasek abesti bat idatzi zuen, seme-alabek eta bilobek koruak egiten dituzte eta tresnak jotzen dituzte. Azken abesti bilduma hau aurreko kantuekin lotzen jolas gaitezke: *Chiribitas de limón* eta *Caramelo de limón*; *Don Marcial* eta *Fulgencio Pimentel*; *El rey de la selva* eta *El oso poderoso*; *El chalé* eta *Un metro cuadrado,* eta Vainica amonak sentituko ditugu, denbora abestien gainean pausatua, abestiei eskarmentu handiagoz helduz. *El ruido* kantua baliteke aurreko diskoaren zoritxarreko ekoizpenari erantzuna izatea, isiltasunaren aldarrikapena. *El museo* kantuan Laura de Cárdenasek ezin hobeto islatu zuen gure heroien asaldura: "*No quiero ir a otro museo / que me entran ganas / de tirarlo todo por el suelo*" (Ez dut beste museo batera joan nahi, dena lurretik botatzeko gogoa ematen dit eta). *Carbono 14*-n ordenagailuaren birusari abesti bat egin zioten era berean, *Página en blanco* izenekoan telezaborra agertzen da, baretasunari aurre egiteko. *Nana en Re* delakoan haurren fantasiara itzultzen dira beren bilobekin: "*Vamos a cazar todos juntos gamusinos*" (Goazen denok batera *gamusinoak* ehizatzera), maitasun horrek eraman ditzala uzten dute, ironiarik ez da; *La flor de la canalla*-k, ordea, amona rockzaleen azken kartutxoak erretzen ditu, beste biloba nagusiago baten bila abiatzen direnean Madrileko tabernazuloetan barna. Eta Vainicak betiko joan zitzaizkigun El Paisaje kantuarekin: "*Mira / ven aquí / todo lo pinté / pensando en ti / solo / para hacerte soñar / y reir*" (Begiratu, zatoz hona, zugan pentsatuz margotu nuen dena, amets eginarazteko, barre eginarazteko) eta orduan konturatzen gara masailetan behera irristatu zaizkigun malkoak lurreraino erori direla. Ipuina, a ze pena, amaitu egin da.

**IRENE ORMAZABAL FERNANDEZ.** ELGOIBAR, 1978
Musika jartzailea
placidayeye.blogspot.com

[ 93 ]



## **LOOKEY DOOKEY** | ASKOREN ARTEAN

Crypt Records, 2000

Tim Warren rock'n'roll arkeologo eta Crypt Records diskoetxe zantarraren jabeak 50eko hamarkadako rhythm and blues artista ezkutuekin onduriko bilduma da *Lookey Dookey*. Aipaturiko zigiluak etxera bidali zidan katalogoan aurkitu nuen. Egunkarietako paper finarekin eginiko izendegi mardul bezain taliban hura *50's R&B, 60s early 70's soul/funk, 60s Punk, Instrumentals & Surf*, eta antzeko ataletan atonduta zegoen. Hain zuzen ere, *50's R&B* horretan agertzen ziren diskoen iruzkinetako adjektiboei erreparatzen nien zur eta lur, hala nola, *cheesy* (kalitate txarrekoa, baina xarmaduna), *greasy* (grasatsua), *frenzy* (frenetikoa), edo *stomping* (gogor zanpatzen duena). Grabazio horietako artisten izenek ere nire jakin-mina piztu zuten ziztuan, tartean, Esquerita, Richard Berry, Young Jessie edo Screamin' Joe Neal. Hala, musika beltzaren esparru koipetsu horretan murgiltzen hasi nintzen, The Gories hirukotearen diskoek eragindako estreinako zirrara tarteko.

Unibertso horretan sartu eta berehala bilduma hau eskuratu nuen. Bertan, gerora niretzat askoz ere ezagunagoak egingo ziren musikariak entzun nituen lehendabizikoz: King Coleman soul eta r&b kantariaren ahots baxu eta oihularia (bildumak bere kantutik hartzen du titulua); Jerry McCainen aho-soinua; Big Maybelle andre drogazalearen ahots urratua; Detroiteko Fortune diskoetxearen labelarekin zetorren Andre Williams lizuna; Bunker Hillen garrasi lunatikoak… eta horrela 20 kantu bildu arte, tartean, Bobby Long & His Satellitesek jasotzen duten *Mojo Workout*, nire ustez diskoko doinurik onena.

Bildumak oraindik biziki maite dudan beltz ezezagun mundrunezko zingira deskubritu zidan. Gerora *rock'n'roll* izenarekin ezagutuko genuen estilo zuriaren betunez blaituriko jatorria. Kantu motzak; erritmo bizi eta basatiak; musika tresnak, batez ere, bateria, gitarra, saxo eta pianoak, eta ahotsak mugara eramanez, alegia, soinu-adierazgailuetako orratzak gorrian jarri arte; gehienetan ordu gutxi batzuetan grabaturikoak, eta sosik eragin ez zutenak. Testu hau amaitzen dudan artean, Xabier Montoiaren azken liburuari izenburua ematen dion kontakizuna datorkit burura, alegia, *Fucking Artists* narrazioa. Kontatzen dena irakurri beharra dago *Artista Puta* horiek sorrarazten duten miresmen irrazionala ulertzeko. Hortaz, *totally smokin' 50s R&B hoot*!

**JULEN AZPITARTE.** BERMEO, 1971
Musika kazetaria
nazioanfibio.wordpress.com

[ 94 ]

## AND THEN NOTHING TURNED ITSELF INSIDE-OUT | YO LA TENGO



Matador, 2000

Behin, lagunekin musikari buruz ari ginela, bat-batean batek ea zein izango litzatekeen *gure diskoa* galdetu zuen, hau da, gure bizitzan ezinbestekoa zen *diskoa* aukeratu behar genuen. Eztabaidan hasi ginen, azpimarratuz ezinezkoa zela disko bakarra aukeratzea, uneak agintzen baitu zein musika aukeratu.

Hainbat disko genituen buruan. Dena den, nire lagunekin hizketan nengoela burura etortzen zitzaidan uneoro disko eta talde berbera; ez nuen inolako zalantzarik *nire diskoa* Yo La Tengo taldearen *And Then Nothing Turned Itself Inside-Out* zela. Nolakoa den bizitza, ezta? Urteak eta urteak musika entzuten, kontzertuez disfrutatzen, eta hainbeste eskaintzaren artean beti dago talde bat, edo disko bat. Nire kasuan oso erraza izan zen… eta hau ez da oso normala nire bizitzan beti zalantzan nabilelako edozein gauza erabakitzeko… baina tira, musikarekin behintzat ez da horrela izan.

90eko hamarkadatik ditut Yo La Tengo taldearen erreferentziak eta, ez nago ziur, baina nire lehenengo aukera zuzenean ikusteko 1995 inguruan izan zen, *Electr-O-Pura* diskoaren biraren barne. Gogoan dut iraileko ostiral aspergarri batean izan zela. Ikaslea nintzen eta oraindik oporretan nengoen, horregatik kontzertu batera joatea beti erakargarria iruditu zait. Hortaz, pozik heldu nintzen hara baina erreferentzia gutxirekin, taldea ez nuen asko ezagutzen eta. Kontzertua hasi eta berehala hunkigarria iruditu zitzaidan. Oso ondo gogoratzen dut kontzertu hura, oso berezia iruditu zitzaidalako Irak teklatua jotzeko zeukan modu hori, edo Georgiaren ahots suabe hori, hari bat bezala eta, nola ez, gitarra jotzeko modu hori. Dena ezberdina iruditu zitzaidan. Nola esan? Aldrebes eraikitzen den musika iruditu zitzaidan eta berehala lotu nuen nire dantzatzeko modu aldrebesarekin. Egia esan, erabat hunkitu ninduen eta erreferentzia musikal bihurtu zitzaidan.

Hortik aurrera saiatu nintzen taldea jarraitzen, baina dakizuen moduan bidean hainbat proiektu interesgarrirekin egiten dugu topo eta galduta ibili nintzen urte batzuetan. Horregatik ez nion ondo erreparatu *I Can Hear the Heart Beating as One* diskoari. Dena dela, 2000. urtean nire eskuetara berriro heldu zen Ira, Georgia eta Jamesen disko berria, *And Then Nothing Turned Itself Inside-Out*, eta modu magiko batean berehala diskoaren barruan sartu nintzen hortik irteteko aukerarik gabe. Hamahiru opariz osatutako disko hau nire bizitzan sartu zen inoiz ez ateratzeko. *Everyday* kantarekin hasten da diskoa eta honekin berehala sartzen zara Yo La Tengok sortzen duen atmosfera berezi horretan. *Everyday*-ren kutsua erabat iluna da… baina *Our Way to Fall*-en itxaropena eta alaitasuna aurkitzen dugu. Hurrengo kantuan, Georgiaren ahots berezia entzun dezakegu inolako apaindurarik gabe. Laugarrenean mugimendua eta alaitasuna leku



guztietatik aurkitzen dugu. *Last Days of Disco* eta *The Crying of Lot G* kantuetan Ira Kaplanek berriro lasaitasunera hurbiltzen gaitu. Hurrengoan zurrunbilo batean sartzen gara ahots ezberdinen nahasketari esker. Orduan *Tears Are in Your Eyes* heltzen da tristura sorrarazteko prest eta, katarsi bat bezala, *Cherry Chapstick* agertzen da haien gitarrak desegiten. Bat-batean katarsia mozten da *From Black to Blue* eta *Madeline* abestiekin. Bukatzeko, Yo La Tengoren atmosfera berezi horretan sartzen gara berriro *Tired Hippo*-rekin eta, batez ere, 18 minutuko *Night Falls on Hoboken* amaiezinarekin.

Nik esaten dudan moduan, diskoa biribila da eta paisaia, emozio eta leku ezberdinetatik pasatzeko aukera ematen du, gorputz eta ariman sartuz.

**IDOIA BREÑAS GLZ. DE ZARATE “UHINA”.** GASTEIZ, 1972
Musikazalea

## [ 95 ]

## **RELATIONSHIP OF COMMAND** | AT THE DRIVE-IN



Grand Royal Records - Fearless Records, 2000

**EZINEGON ANTOLATUA**

Eztabaida eternitatea bezainbeste luza zitekeen, horretara jarriz gero: noiz hasi zen milenioa, 2000. urtean ala 2001.ean? Marketin arduradunak “bi mila!” eta matematikariak “bi mila eta bat!”. Ez ziren konturatu, ahari-talkan ari ziren bitartean milenioa bazihoala aurrera, eta inor gutxiren intereseko gaia zela ordurako, bizi egin behar baitzen batez ere, bizi, historiaren amaiera omen zen garaia. Kazetariok, berandu baina seguru, eduki genuen gure erantzuna. Zehatza, azkena erabatekoa izanen zena: 2001eko irailaren 11n hasi zen milenioa, pelikula baten gisan hasi ere; Iraken, Afganistanen oraindik kredituirik erakutsi ez duen pelikula, berriki Libian egin duten *remake* negargarria ahaztu gabe, noski. Baina urrun samarretik abiatu gara eta, berez, musikaz idatzi behar genuen, ezta? Ba, jakitun izanik oraintxe hartuko dugun errebuelta autoarekin eginez gero punturik gabe geratuko ginatekeela, esango dugu hegazkina dorrean nola, halaxe sartu zela At the Drive-In taldearen *Relationship of Command* diskoa askoren belarrietan 2001. urtean –2000.eko irailean eman zen argitara ofizialki–.

Hardcore, post-hardcore... etiketak besterik ez dira, merezi duten diskoek soberan dituzte. Kultuzko lan bihurtu da argitaratu zenetik hamabi urte joan diren honetan, taldearen emaitzarik onena izateaz gain, azkena ere izan zelako. Gero: istripu bat, bandako partaideak traumatizatu zituena; Australiako Big Day Out jaialdian hiru kantu jo eta ospa egitea, entzuleen pogoari bortitzegia iritzita –egun berean Jessica Michalik nerabea asfixiaz hil zen Limp Bizkiten kontzertuan–; eta azkenik, Europako bira bertan behera uztea, “erabateko akidura mental eta fisikoa” zela medio. 2001eko martxoan esan zuten agur. Ez zirudien berriz bueltatzeko plazera eman behar zigutenik, guri, Gorlizko Xurruten jo zutenean batek daki zertan aritzeagatik, inoiz zuzenean ikusi ez ditugunoi. Baina halako batean Twitterreko mezu batek “ATTENTION !” dio. @AtTheDriveIn idazten ari da. “To whom it may concern:”. Horiek gu gara. “AT THE DRIVE-IN will be breaking their 11 year silence. THIS STATION IS .... NOW ....OPERATIONAL”.

Berriz errepidean direla, alegia. Disko berririk ateratzeko asmorik ez omen dute, baina tira, beti geratuko da *Relationship of Command*, aurreneko segundotik zalditeria amorratua legez gainetik pasako zaizun diskoa. Arritmiak, espasmoak hamaika kantutan –hamahirutan, Japoniarako prestatu zuten edizio berezia deskargatzen baduzu–, dena intentsitate, disonantzia, eztarri larrutu. Lau ertzeko borobil bat, beherantz igotzen eta gorantz jaisten den eskailera bat, hara zer den disko hau. Cedric Bixler-Zavalaren prosa kanibalismora hurbiltzen da batzuetan –“*Have you ever yasted skin?*” galdetzen dizu *Arcarsenal*-en, “*dastatu al duzu inoiz larruazalik?*”–, existentzialismora bestetan; hitzak fragmentatuak dira, esangura lausokoak; apokalipsiaren biharamunean idatziak dirudite hainbatek –*One Armed Scissor* bikainak, kasu–; kantatu baino errezitatu egiten dituzte beste zenbait,

*Invalid Litter Dept.* edo diskoa ixten duen *Non-Zero Possibility*, berbarako; eta osorik entzunda, anekdotaren mailan geratzen da *Rolodex Propaganda*-n Iggy Pop-ek egindako kolaborazioa –nork daki urte batzuen buruan ez ote den Iguana izango *Relationship of Command*-en abestu zuela kontatzen ibiliko dena?–.

Besteak beste Fugaziren eta Rage Against the Machinen iturrietatik edaten, hamarkada osorako balio izan duen soinu banda da disko honetakoa. At the Drive-In taldeak jakin zuen Mendebaldeko asepsiak sortzen duen ezinegona antolatzen, eta aurreikusi zuen hondamendia etorri, bazetorrela, ikusi nahi izan ez arren –ez esan "*I'm just tired of counting bodies*" esaldiak, gaur egungo betaurrekoekin leituta, kutsu profetikoa ez daukanik–. Zer egin dugun azken urteotan, zer ongi, zer gaizki, gehiago egin genezakeen, eztabaida eternitatea bezainbeste luza liteke. Bitartean marketin adituak "bi mila!" eta matematikariak "bi mila eta bat!" jarraitzen dute, orain langabezian. Ez dira konturatu, ahari-talkan ari diren bitartean milenioa badoala aurrera, eta inor gutxiren intereseko gaia dela honezkero, bizi egin behar baita batez ere, bizi, historia berriz hasi den garaia.

**GORKA BEREZIARTUA.** HERNANI, 1984
Kultur kazetaria, blogaria
argia.com/boligrafo-gorria

**[ 96 ]**

## **POSTROF** | DUSMINGUET



Chewaka/Virgin, 2001

Zaila izango da asmatzea noiztik entzuten duzun musika. Amaren-aitaren lagun batek esan zion ona omen zela zure garapenerako musika klasikoa entzun(?)araztea. Jaio bezain pronto, amatxik (*aitatxik, amamak, aitonak, amumak, aitxitxek, amonak, atxitxek, aititek* edo deitzen duzun erara deitzen duzula ere) aspaldian euskaraz ikasitako sehaska kanta bat abesten zizun, eta zeuk, zehatz-mehatz ulertu ez arren (ez zehatz, ezta mehatz ere; baina ulertu egiten zenuen nolabait), irribarretsu erantzuten zenion, ulergaitz bezain maitagarri egiten zitzaion hots batez. Haur-eskolan, *Pintxo Pintxo*-tik hasi eta ikasturteak zituen egunak bete arteko beste kanta entzun eta kantatu egin dituzu. Baina lehenengoa zein izan zenuen? Oporretan zindoazela, aitak edo amak kotxean Benito Lertxundi (ez Benito *el de Txurdi*), Chavela Vargas, Serrat edo Sabinaren zintekin ematen zenituen Espainiako *kintokuloko* herri hondartzadunera ailegatzeko hamaika (mila) (miloi) orduak. Koskortu heinean, eta bizitzatik hartzen zenituen gauza guztien kontra egin nahian, anaia, arreba, ahizpa edo(ta) neba nagusiaren gelan sartu, apalategian oso ondo lerrotuta zituen kopiatutako (artean *pirateo* hitza asmatu gabe zegoen, eskerrak jainkoari/Nietzscheri) kaseteak ostu eta existitzen ziren baina entzuten ez zenituen punkaren irainez gozatu egiten zenuen... Gozamena, gero! La Polla, Kortatu, Negu Gorriak, Hertzainak, Potato, Kojon Prieto, Reincidentes, Extremoduro... Klasera ailegatu eta Loquillo,

La Unión, Take That, Mecano eta enparauak entzuten zituztenen aurrean auzoko mutiko/neskatorik txarren agertzen zinen *palestino* bat lepoan zeneramala. Idazte hutsak hotzikara sorrarazten du, ezta? Edo ez. *Gure jarrera*...

Nik badakit zehatz-mehatz noiztik hasi nintzen musika aditzen. Dusmingueten *Postrof* diskoarekin izan zen. Disko horrekin ulertu nuen musika ez zela harrikoa egin, logela garbitu edota irakurri bitartean erabiltzen duzun soinu banda. Musika entzute pasibotik musikaren autopsia dekonstruktiboa egitera pasatu nintzen. Hasi nintzen abesti osoa musika tresnaren arabera entzuten. Ea zer egiten duen perkusioak. Ea baxuak. Eta pianoak? Joder! Zenbat instrumentu dago hemen ba? *Postrof* ez zen nire belarrietan sartu. Belarrietatik sartu eta burmuina, gihar guztiak, bihotza, hankak, zakila, titiburuak eta ileak astindu zizkidan. Konturatu nintzen abesti bakoitzaren barruan kapa pilo bat dagoela, kipulak dituenak baino gehiago, neguan hotz dagoenean eta hainbat kamiseta-jertse-txaleko-txamarra jartzen ditugunean bezala, arkeologoek Konstantinoplako ikerketak egin zituztenean aurkitu zituzten beste, Fukushimako eta Txernobilgo zentral nuklearrek behar zituztenak baino askoz ere gehiago... Gerora deskubritu nuen Mad Professorren eskuak tartean zirela *Postrof*-en.

Baina ez hori bakarrik. Disko horrek munduan zehar bidaiatzeko grina piztu zidalakoan nago. Izan ere, lehenengo kantua entzutean, eta lipar batez begiak itxiz gero, Marokora egin ahal duzu bidaia erraz asko, marokoar peto batek egiten duen aurkezpen hirueledunaz. Eta haraxe joan ginen koadrilakoak. Beste batzuetan, Atlantikoa zeharkatu, Latinoamerikara ailegatu eta kunbia eta son kubanoa jorratzen dituzte. Eta haraxe joan ginen beste urte batean. Katalunian bertan ere geratzen dira (haiek, La Garrigakoak dira-eta), eta sardana bat egiten dute. Eta haraxe joan nintzen bizitzera urtebetez. Mazedoniara ere egiten dute jauzia... Agendan dudan hurrengoko bidaia dut horixe, hain zuzen ere.

Gaur egun entzuten dudan musikarekin batere zerikusirik ez badu ere, oraindik ere entzuten dut. Aitortzen dut. Egunerokotasunarekin apurtu eta milaka kilometrora dauden herrialdetara ihes egin nahi dudanean, diskoa jarri eta lehenengo kantaren d'rbuka doinuek alfonbra magikoaren lanak betetzen dituzte. Hara igo eta datozen abestiek aukeratzen dute alfonbrak egingo duen hurrengo geldialdia.

Azkenik, disko honek musikarien duintasunaz hausnarketa egiteko ere balio izan zidan. Akordatzen naiz, gaur izango balitz bezala. Aste Nagusian, agertokian Potato eta Akatz taldekoek jo behar zuten. Reggae-ska gaua antolatuta zegoen txosna batean. Euria gogotik ari zuen. Akatzekoek jo zuten eta Potatokoek ez. Jendea irentsitako garagardo-kalimotxo-patxaranak kexaka agertu zen. Orain ez dut buruan Potatoko ala Akatzeko batek esan zidan honakoa: "Ez al dakizu nola hil zen Dusminguet-en baxu jotzailea?"

Potato eta Akatz askotan ikusi ditut ordutik. Dusminguet ez dut berriro ere ikusiko taula gainean.

**BORJA GOÑI.** BILBO, 1983
Musikazalea

[ 97 ]



## **NO MORE SHALL WE PART** | NICK CAVE & THE BAD SEEDS

Mute Records, 2001

Bitxia da ohartzea nola osatzen ditugun gure disko gogokoenei buruzko oroitzapenak eta istorio propioak. Uste dut Anariri elkarrizketa batean irakurrita izan nuela Nick Caveren berri, eta hala izan ez bazen horrela gogoratzen dut behintzat. 1980ko hamarkadan jaiotakook gauza batzuk alderantziz, edo behintzat aurreko belaunaldiek ez bezala jaso izan ditugulako froga beharbada, pista hari jarraiki iritsi nintzen orduantxe Nick Cave and the Bad Seedsek argitaratua zuten *No More Shall We Part* diskora, duela hamar urte.

Hogei urte nituen nik, eta hogeita hamar zituen lagunak esanak gogoratzen ditut, nola inbidiaz eta denborak ekarritako eszeptizismoz (eta paternalismoz, dena esan behar bada) hitz egiten zigun Nick Caveren diskografia osoa deskubritzear genuen hogei urteko gaztetxo apasionatuoi. Hamarkada bat beranduago, lagun haren tokian egotea tokatzen zait eta, bai, zailagoa da entusiasmo erabatekoa disko edo liburu baten aurrean, sorpresa eta mundu bat zabaltzen zaizulako sentsazioa, nekeza da sublimearen aztarnak topatzea artelanetan. Auskalo hala den, baina gustatzen zait pentsatzea gauza askotarako bidea eman zidala disko honek: Caveren beraren diskografiarakoa (ordura arteko lanak eta ondorengoak), beste erreferentzia-mundu baterakoa, estetika nigandik urrunagokoetara... Urte batzuk lehenago Ruper Ordorikaren *Hautsi da anphora* diskoak poesia eta literatura ia deskubriarazi zizkidala pentsatzea gustatzen zaidan bezala. Eta horregatik pentsatzen dut *No More Shall We Part* erantzungo nukeela egunkariko elkarrizketa ergel batean galdetuko balidate nire disko kuttunenaz. Horregatik, eta hamar urte geroago entzunda hunkitzen nauelako oraindik. Eta maiz gure buruari disko kuttunenaz kontatzen diogun gezurrak aldaketa gutxi onartzen duelako, zergatik ukatu.

Hastapenetako blues-rock zakarretik urrun, 1997an *The Boatman's Call* ia piano soilean oinarritutako diskoa plazaratu ostean argitaratu zuen Cavek *No More Shall We Part*, hein batean haren jarraipentzat har daitekeena musikalki; baina hein batean soilik, izan ere, lau urte lehenagokoan jasotako amodiozko balada dotoreen aztarnarik bada 2001ekoan (*Love Letter, And No More Shall We Part*), baina *crooner* trazak hartua zituen Cavek izkin egin zion saloiko musika egiten laketzeari beste behin. Disko hau lotarako jartzen duena, izan ere, bat-batean astinduko dute *Fifteen Feet of Pure White Snow* kantuko gitarrek eta Caveren ahots desesperatu eta lakartuak. Beharbada lotarako baino insomnio gau bateko musika delako hau, insomnio gauetako desosegua, larridura, baretasuna bilatu nahi eta ezina jasotzen dituena. Mediokritatearen eta larriminaren aurrean baretasuna zerbait gorenean (maitasunean, edertasunean, jainkoan) bilatzen du etengabe Cavek pianoa tarteka laztanduz, tarteka kolpatuz eta kantuei batzuetan errezoaren tankera emanez (*Oh My Lord* edo *Hallelujah* mantra baten

gisa errepikatzen dituenean, McGarrigle ahizpen koroak lagun). Baina nekez ematen dio Cavek entzuleari sosegu erabatekoa, eta kanturik espiritualenetan ere ironiari tartea egin eta heldulekurik gabe uzten du bat (*God Is in the House*). Eta pentsatzen dut orain nire haurtzaro katolikoko meza-kantu haien lekua ez ote duen hartu Nick Caven musikak, distantzia ironikoz orain, bestelako mistizismorik sinesgarri egiten ez zaigunean.

Dikotomia indartsuen arteko jokoan oinarritzen da disko hau, Caveren gehienak bezala (baretasuna eta intentsitatea, ona eta gaizkia, edertasuna eta zatarkeria, harmonia eta zarata, zerua eta infernua, ironia eta transzendentzia) eta disko honetarako Bad Seeds taldean artean gero eta presentzia handiagoa hartzen ari zen Warren Ellisen biolina bezala, batzuetan melodia harmoniatsuetan, besteetan disonantziaren ertzean mugitzen dira kantuak, Cavek batzuetan xuxurlatu hurrengoan garrasi egiten duen bezala. Eta bai, akaso horregatik hunkitzen nau hamar urte beranduago ere, musika eta hitzen bidez bizitzaren beraren anbibalentziez hitz egiten didalako, artelanei eskatzen diedan desosegua dakarren sosegua ematen didalako eta edertasunean, nolabaiteko sublimean (bai, barkatu) sinesten jarraitzeko arrazoiak ematen dizkidalako. Edo hala sinetsi nahi dut, behintzat.

**IBON EGAÑA.** URNIETA, 1981
Literatur kritikaria

## [ 98 ]

## **LOS DIARIOS DE PETRÓLEO** | CHUCHO



Chewaka, 2002

Ziurrenik, nik baino bizitza interesgarriagoa izan du Fernando Alfarok. Askoz interesgarriagoa, inondik ere. *Los diarios de Petróleo* berriz entzuten dudan bakoitzean pentsatzen ditudan gauzetako bat da.

Fernando Alfarok bularra erdibitu zuen, bere burua goitik behera bitan banatu eta disko honetaz erditu zen. Oraindik bero den zaurian, oraindik azalgorrian, bizi dira kantu hauek gure buruan entzuten ditugun bakoitzean. Gure buruan baino gehiago, gure erraietan. Fernando Alfaroren kantuek toki hori bete izan dute beti, gure izatearen sakonenean. Bere istorioek, maitasun eta odolezkoek, hortik entzun ditzazun eskatzen dute, hala egiten ez baduzu, honek guztiak ez du ezertarako balioko. Horrela baino ez duzu ulertuko zer gertatzen den *El secreto de la ciencia, Abre todas las ventanas* edo *Chapoteosis de la bañera* kantuetan. Horrela baino ez duzu ulertuko amildegiaren ertzean bizitako bizitza bat. *Zintzotasun ikaragarria* esakunea suarekin idatzita dituen eguneroko baten orrietatik kontatutako bizitza.

Izan ere, hau ez bada gauzak gertatu eta sentitzen diren bezala kontatzea, ez dakit zer izango den hori. Ez dago beste modurik. Soilik Fernando Alfarok astin gaitzake horrela. Ez baita gauza bera nik kontatzea, errutinaz eta aspertzez osatutako bizitzarekin, edo berak. Ez, ez da gauza bera.

**JAVIER RUIZ.** PALMA, 1978
Blogaria
lanadadora.com

**[ 99 ]**

**ALICE** | TOM WAITS — TOM WAITS | **ALICE DEMOS**

Anti-, 2002 — Pirata, auskalo noizkoa

**BALEAREN AHOTSA OIHANAREN ERDIAN**
Aitor dut, *friki* hutsa naiz: Tom Waitsen diskografia osoa iruditzen zait zirraragarria. Hala ere, *Alice* aukeratu dut lerro hauetarako, bidelagun izan dudalako sarri hainbat lagunekin egindako antzezlanetan. *Alice*-k antzerkia du iturburu, hain zuzen ere: Waitsek Robert Wilsonekin 1992an egindako elkarlanaren emaitza da, Charles Dogsonek (edo Lewiss Carrolek, nahiago baduzue) neskatxekin zuen obsesioan oinarritzen dena. *Blood Money* apartarekin batera iritsi zitzaigun *Alice* 2002an, soinuen zirkua bor-borka.

Diskoan barneratu ahala baso iluna topatzen dut nik, eztarri bakar batean kabitzen den oihana. Baso honek ez du iratxoen beharrik magikoa izateko, magia ez delako denbora-pasa inozoa (ez badira iratxo mozkorrak bederen): nahikoa da zuhaitz oker, itsusi eta konkordunen hotsa entzutea, haien adarrak elkarrekin talka egiten, haizeak itotzen duen soinua sentitzeko. Doinu melodiko eta ederren eztenak nagusitzen diren disko honetan *Kommienezuspadt* izenekoa da niretzat harribitxia, oihaneko soinu guztien laburpena, Mikel Laboaren ahotsean amesten dudan kantua. Kapelaren azpian sartzen den oihana basa, burmuina bularrean taupaka, bihotza begietan sartuta, animalien mugimenduaren soinua sustraietan erroturik. Balea bat oihanaren erdian, txori batekin duen maitasun istorioa, kantuz haztatzen diren begiak.

Wilsonekin antzezlana egin eta disko ofiziala atera arte hamar urte pasa ziren. *Alice* ofiziala bezain garrantzitsua izan da niretzat haren aurretik ezagututako *Alice Demos* delakoa, aipatutako disko ofizialaren aurrekari pirata. Ez galdetu nondik atera zen, Waits bera baino Waitszaleago den lagun batek oparitu zidan (Tom Waitsen urtebetetzea ospatzeko hitzordua jarri genuen inoiz bere etxean, whiskya eta tortilla patata gau osorako menu bakar). Gerora ezagutu ditudan doinu ofizialen bertsio biluziagoak ziren haiek, eta bazen bestelako altxorrik ere: ahotsik gabeko pieza instrumental ugari, disko ofizialean *Fawn* delakoan soilik islatu den ildoa. Sarritan atera izan gara demo instrumentaletan bildurik oholtzara, Waitsen erraietako zirkuaren erritmora.

Hitzen orbela zapaltzen duen soinu banda duzue hauxe, *krask* eta *bound*, pertsonon argitzalen eztanda iluna. Iluntasun osoa dagoenean ikusten delako izar gehien… "*The rain makes such a lovely sound, to those who are six feet under ground*!"

Zer nahi duzue esatea ba. Waitsen iluntasunak argitzen dit niri eguna:
Zoriontsua izateko behar diren
oinarrizko gauzak dira:
komuneko papera
ur beroa
kafea.
Apur bat estutuz gero aipatuko dizut ere
dutxatu bitartean Tom Waitsen kanta bat entzutea edo
aho baten ertzeko paisaian murgiltzea ere
oso lagungarria dela.
Baina tira,
funtsean eta laburbilduz
zera nabarmenduko nuke:
une bat iraungo duen zoriontasuna
erdiesteko ezinbestekoak dira
sinatzailerik gabeko manifestuak
independentzia
doako depilazioa.

Alice bezalako disko batean imajinatzen ditut horrelako egunak, balea ajedun baten ahotsarekin mintzo den sortzailearen kapelupean.

**OIER GUILLAN.** ORERETA, 1975
Musikazalea
akiribarog.com

[ 100 ]



## **THE ESSENTIAL LEONARD COHEN** | LEONARD COHEN

Sony, 2002

**SO LONG, LEONARD**

Kafea eta galletakekoek kolaborazioa eskatu zidatenean harritu eta beldurtu nintzen. Harritu urteetan nire hautaketa musikala arrunta, arruntegia izan baita. Ni Benito Lertxundi eta 40 Principalesekin koskortu nintzen. Ez nuen izan Lluis Llach edota Tom Waits entzunarazten zidaten anai-arreba zaharrik. Ezta Londresetik diskoak ekartzen zizkidan lagunik. Eta lanean hasi nintzenean ekin nion Radio 3 entzuteari.

Hezkuntza musikal eskas honek beldurtu ninduen. Ezin disko zehatz bat hautatu. Nik diskoak baino gehiago kantariak maite ditut. Eta horien artean, bat nator Jabier Muguruzarekin: handiena Leonard Cohen da. Kanadarra proposatu nuenean, "hartuta dago" esan zidaten. Ez nintzen kikildu. "Besteak zein disko aukeratu du?", galdetu nuen. "1974an kaleratutako *The Best* bilduma" erantzuna. Eureka. "Nik *The Essential* hartuko, 2002an argitaratutakoa". Bost hamarkadako karrera laburbiltzen duen diskoa. Besteak karreraren hasierakoak aztertuko zituelakoan, nik berriagoez idatziko nuela aginduz, nire nahia bete nuen.

**POESIA XUXURLATZEN DUEN AHOTS LIMURTZAILEA**

"*If it be your will that I speak no more ... I will no speak more*" (*If It Be Your Will*) 1984ean estreinakoz grabatutako abesti eder honetan Leonardek gehiago hitz egingo ez duela dio bere amodioak horrela nahi badu. Nik ez nioke inoiz hori eskatuko. Hain zuzen, Cohenetik gehien gustatzen zaidana ahots limurtzaile, sakon hori baita. Kritikoen arabera, tenorretik baritonora aldatutako ahotsa, urteen eta tabakoaren poderioz.

Ahots sakonek konkistatzen naute. Ondorioz, ez nioke LC-ri isiltzeko eskatuko. Ahots hori ez galtzearren, horren bitartez xuxurlatzen dituen hitz, poesiaz beteriko esaldiak ez galtzearren. Cohenek idazteko dohaina du. Kantuez gain, saritutako hainbat poesia liburu eta eleberri publikatu baititu. Eta disko honetan, beste poeta bati egindako omenaldia jasotzen da: 1988an Federico Garcia Lorcaren *Pequeño vals vienés* itzuli eta musikatu zuen *Take This Waltz* sortuz. Granadako poetaren omenez ere, alaba Lorca bataiatu zuen.

**AMODIOAZ, HERIOTZAZ ETA BESTE GAITZEZ**

Poesiaz tratatu ditu sexua, maitasuna, gerra eta erlijioa. Abesti berrienetan, poesiaz inguratu ditu politika eta justizia soziala. *Everybody Knows* (1988) abestian hiesari, erlazioei eta arazo sozialei erreferentziak daude. *Democracy*-n (1992), berriz, Ameriketako Estatu Batuetan demokraziarik ez dagoela ondorioztatzen du.

Urteetan amodio kantu ederrentzat jo izan dut *Dance Me to the End of Love* (1993). Izugarri maite nuen. Are maitagarriago egin zait jakin ondoren zerk inspiratu duen. Holokaustoan, hainbat sarraski eremutan, judutarrak gas

ganberetara sartzen zituzten, hiltzera, soka laukote batek jotzen zuen bitartean –"*Dance me to your beauty with a burning violin*"–. LC-ren esanetan, bizitzaren bukaerak, ederra, apasionagarria den zer edo zer dauka. Eta pasio bertsuarekin errenditzen gatzaizkio maiteñoari. Heriotza eta maitasuna plano berean.

Abizenak argi uzten du: Cohen judutarra da. Urte batzuk monje budista egin zituen, baina judutar jarraitzen du izaten. Eta luze eta zabal erabili izan ditu erreferentzia biblikoak. Aingeruak eta infernua agertzen dira esaterako *Ain´t No Cure for Love* (1988) kantuan; *Hallelujah* kantuan berriz, Sanson, Dalilah eta David aipatzen ditu. Horretan ez nator bat Cohen jaunarekin. Ez naiz fededuna. Baina 1984an publikatutako kanta-ereserki honek zirrara sortzen dit entzuten dudan bakoitzean. Kantari askori gauza bera gertatu ote? 200 bat bertsio baitaude. Eta bakanen bat, igual originala baino hobea. Jeff Buckley edota KD Langena aipatu didate bakan batzuek. Zuek aukeratu.

Ironikoki nire faboritoenen artean *The Partisan* (1969) dago. Eta ironikoki diot, jatorriz ez baita Cohenena. Askotan bertsioneatua izan den kantariak berak orain bertsio bat egiten du. Frantziako Erresistentziaren aldeko abestia, errusiar errefuxiatu batek Londresen egina. Frantsesez jatorrian, agian horregatik edo, hainbat pasarte frantsesez ematen ditu Leonardek. Urte askotan iruditu zait bere hiriari, Montreal hiriari omenaldia. Erdi frantsesez, erdi ingelesez bizi den hiriari omenaldia. Multikulturalismoari omenaldia, izatez gerra kantua dena.

Horregatik guztiagatik, ez dut dudarik. Eskaintza onartu diot. Gure, nire gustuko maitale izateko prest dagoen gizonari baietz esan diot, bere diskoa jarri dudan orotan: "*If you want a lover, I'll do anything you ask me to do. And if you want another kind of love, I'll wear a mask for you*" (*I'm Your Man*, 1988). Inongo maskararik gabe, Leonard Cohen, nire, gure gizona da.

**KRISTINA ZORITA ARRATIBEL.** DONOSTIA, 1968
Musikazalea



## **COIEDA** | TAKAGI MASAKATSU

W+K TOKYO LAB, 2004

Bidaiatzera noa.
Japonia aldean nago kokatuta eta hementxe hasten da musika bidaia.
Dudarik gabe hiri sofistikatu batetik abiatzen naiz.
Non egunsentia den.
Konturatu gabe, entzuten dudanak amets itxurako irudiak sorrarazten dizkit.
Bidaia epiko guztietan bezala, emakumezko koruek zentzua galtzera gonbidatuta, berehala lurralde handi eta berdeetan kokaturik nago.
Nolatan ba… Alfonbra berde eta bukaezinean te berdearen usainarekin, edo kafetegikoa al da? Edo kanpoaldean nabil edo agian, hau izango den susmoa, bidaiari geldia naiz… berriz ere.
Antzinako garaietan ez nago! Etorkizunean…. ere…. ez! .. ala…bai!
Kultura aldaketa besterik?…. Orainaldiarekin lotura zuzenik…. Noiz?
Nire burua galduta, ez baitakit non eta noiz nagoen eta hauexek dira oinarrizko lokarriak niretzako…. Axolarik ez…
Galduta….Berriz ere…
Tuneletatik pasata eta landa akustikoak nire aurrean, alboetan David Sylvian aurreari begiratzen katana batekin lurra urratzen atzealdeari mespretxua egiten… konturatu gabe.. beste denboraldi batean…leihatilatik ikusten dut eta begiak itxi….grixak dirudite eta ekintza gogorren ikuslea sentitzen naiz…lasai…lasai… gezurrezkoa da…lasai
Gezurra.
Mundu elektroniko xuabe, malda xumeen gora-behera…barrezka. Mikrokosmoa osatzera doalarik eta…finito ekosistema?
Infinitua…orain? Noiz?
Berriro, ere, garraio modua sumatzen dut. Musika egitura eta egitura musika besterik artifiziorik gabe edertasunaren bila.
Berarekin jolasean. Serioski.
Nork nire buruarekin jolasean...? barneko bidaia balitz sentitzen dut zirkuitu elektronikoa. Kanpoaldean Shinkansen trena beste aldera jota pa...sa... da... eta konturatu ahala bes…te… bat ni a...u...rrerat…zen…
Irudi berria: Hodeiak buruz behera eta ari du euria behetik gora…nola?
Egitura musikala berbera baina abiada handitan eraikuntza handikoen artean entzuten arigaraiaiaezerkonkreturikbegietanharrapatzerikezdago eta arnasa hartzerakoan… mugimenduen tunela pa..sa..ta.. Jaiak!!
Metalezko rebert-ek edozein momentura naramatelarik biribilguneari biraka gero eta jai jai luzeago…uzeago…zeago…agoa…oan…
Beste bailarara.
Leihatilatik niri begira bat-batean neskatila bat pianoa jotzen ari da musika ikasketa baten birtuosismoaren lezioa behin eta berriro…buklea…berriro…
Pianoa jotzeko atzamar sendo eta lodiak behar direla diote tramankulua menperatzearren bestela musikak janda hilko zaitu eta… gero…zer! ….

Gero istorio berbera, jo..jo..jo.. Gaurko istorioak---
Lasai, lasai gaixotasun garaikideak dituzula?… adixkidea…?
Ez beldurtu… ze barneko bidaia izugarrietan adixkideak sortzen dira… lagunak .. begira… begira… entzun... entzun!!...egunerokoetarako dira.
Eta hori ere ezta batere erraza lortzen…
Ilun!
Tunela eta itsasemakumearrainek kantuek zorabio batean murgilduta berriro… nora?... Auxkalo nora?
Badaezpata txixtuko ditut azken nota hauek nire burukoak balira sentitzen ditut eta…
Bidaia, on, adixkide,… lekura helduta nabil beste bidaia bat lortzekotan Shinkansen berberarekin.. berberarekin… berarekin…ekin!
Pozik nagoenean txixtuka nabil COIEDA likorearekin….

**JAVI ULLA.** 1965, IRUÑA-OKA
Argiztatzailea

## [ 102 ]

## NIRE ANAIAREN KOTXEKO ARGIAK (L´HOMME, L´ETRE, LA MALADIE) | TXUMA MURUGARREN



Gaztelupeko Hotsak, 2004

**IRRATI GAUAK**
Nire oroimenaren ahots ezkutua Txuma Murugarrenena da. Sasoi Ilunak taldea desegin eta 2000tik aurrera, bakarkako ibilbideari ekin zionetik, *Nire leihoak* (Oihuka, 2000) diskoarekin, beti interesatu zait Sopuertan bizi den oreretar honen ekarpen musikala. Poparen eremuan aritu izan da beti, baina musika estilo baten aukeraketa baino gehiago, honek balio izan dio barruak husteko, hain gustuko ditugun istorio bereziak kontatzeko. Kritikak aipatu du Txumaren trebetasuna kantuak egiteko orduan, baina kantugile petoa bada ere, istorioen kontalari bezala nabarmendu da –ez bakarrik musika arloan, hainbat komunikabidetan zutabegile aritzen da eta Bilbo Hiria irratiko *Musikabla* irratsaioa aurkezten du–. Neskak, maletak, abioiak, irratia, gaua, hotelak... bere abestietan errepikatzen diren elementuak dira, hari honi jarraiki ibiltzea gustuko baitu. *Nire anaiaren kotxeko argiak* (Gaztelupeko Hotsak, 2004), pop eremutik elektronikara egindako saltoa da, Templar and Birdyrekin batera ekoiztu baitzuen disko hau, Txumaren disko kutunetako bat. Berarekin batu gara disko honetaz hitz egiteko, eta bat-batean piztu zait nire oroimenaren argi gorria.

*“Ez dut irratian nire abestirik entzun,*
*gosari legea egin eta larruazala*
*ez dut topatzen inon, hotel batean utzita seguru”*

Horrela hasten da *Nire anaiaren kotxeko argiak* diskoa, *L`homme* sarreraren ostean, *Desintoxikazioa* abestia. “Abentura polita izan zen diskoa Templar eta Birdyrekin batera ekoiztea. Aspalditik nuen elektronikarekin zerbait egiteko gogoa, soinu *enlatatuak* eta soinu organikoak nahastuz. Oso lan ederra egin zuten. Gainera, soinuak espresuki disko honentzako dira sortuak, 0-tik sortuak dira”. Abentura hitza gustuko du Txuma Murugarrenek, disko bakoitza lerro desberdindu batez landu baitu, inoiz ez du errepikatu estiloa, eta proposatzen dizudan laugarren disko hau, ez zen gutxirako izan. Egun laguntzen duten musikariek lagunduta grabatu zuen diskoa. Hauexek dira: Natxo Beltran (bateria), Ekaitz Hernandez (baxua), Rafa Rueda (gitarra), Rafa Aceves (teklatuak) eta bera, Txuma (ahotsa eta ekoizpena). Disko hau, boskote honek grabaturiko bigarrena da, *Gauak, neskak eta maletak* (Gaztelupeko Hotsak, 2002), diskoaren ostean, eta esan dezakegu, zalantza izpirik gabe, taldearen sendotasunaren isla garbia dela, Txumak elektronika eremuan egiten duen *abentura* honetan lagun. “Grabazioa benetan izan zen berezia, baina lerro elektroniko honekin jarraitzerik ez dago, errepikakorra izan daitekeela iruditzen zait”

*“amaieran beti goizaldeko orduetan,*
*nekea benetan hasi baino ez den*
*egun berri honetan”*

Baina ba al du Txumak anaiarik? Eta zer demontre gertatzen zaie bere kotxeko argiei? “Bai, (kar,kar) badut anaia bat, eta bere kotxean gindoazela bururatu zitzaigun diskoaren izenburua. Kotxeko argiak argiztatzen duten eremuari begiratzen diogula, eta eremu honetatik kanpo gelditzen denari ez diogula arretarik jartzen komentatzen ibili ginen. Hau, beste eremu batzuetara aplika daiteke, telebistan agertzen dena existitzen dela, eta agertzen ez dena ez, irratian agertzen dena bada eta ez dena ez... Eta honek elbarri edota gaixo egiten gaitu, eta hala ere, pentsatzen dugu aukeratzeko parada dugula. Gizakia gaixo dago... eta gau horretan izan nituen sentsazioak bildu nahi izan nituen izenburu horrekin”.

*“izebaren bainugelan topatu ditut pastillak,*
*nerbioak baretzeko paranoide batek eginak,*
*ez dut aspaldian lagunekin hitz egin*
*desintoxikatzen ari naiz”*

Artea eta sorkuntza erabat desmitifikatuta dauzka Txumak. Izan ere, disko bakoitza hasi eta bukatzen den arte lana dela uste du abeslariak. “Disko bat aurrerapausoa izan daiteke baina hau denborari dagokio, arte edota sorkuntzari dagokionez, aurrekoa gainditu duzula suposatzen du, eta ez dut uste horrela denik, normalean. Disko berri bat, edertasunaren bila egiten duzun saiakera berri bat da. Erabateko edertasun baten bila, eta ez dago erabateko edertasunik. Ala agian, badago baina beti besteengan, zugan ez. Nire kantu batek ez luke sekula lortuko, nirea baita akastuna, hain da nirea ez dela inoiz izango erabateko edertasun horren isla. Nire disko guztiak ikusten ditut berdintsu, denboraren pasatzean. Egia da, *Nire anaiaren kotxeko argiak* disko berezia dela, oso ausart jokatu genuelako, eta emaitza gustuko izan nuelako, eta horregatik nire diskoetatik kutunetako bat da”.

*“eta orain, bizitza nire oinen azpian
ziztuka, kilikarik ere ez dit egiten urdanga zikinak,
maiz oroitzen naiz kontzientziaren marra ikusezina
zeharkatu gabe nengoela artean, bizitzak
orduan bazuen mamia, ez zen azal hutsa”*

Bi motatako abestiak biltzen dira disko honetan Txumaren aburuz, batzuk pop-rock estilokoak, betidanik gustuko izan dituenak, “baina badira beste batzuk esperimentalagoak. *L`homme* eta *Desintoxikazioa* abestiak oso esperimentalak dira, aldiz, *Atzerriko neska* edota *Laurogeiko hamarkada* kantuek pop-rockaren ildoari jarraitzen diote. Bestetik, *La maladie* Rafa Acevesek egindako piano pieza zoragarria da, txikia baina txikitasun horretan handia. *L´etre* behin eta berriz errepikatzen den abestia, gure akatsak errepikatzen diren moduan, obsesio baten antzera, gero eta nabarmenago, kendu ezinik. *Lantu luzea* arraroena da, sartu edota ez sartu ibili ginen, ez baitago ezer organikoa, dena da makinak tratatua baina diskotik kanpo ikusten nuen, nahiz eta diskoaren filosofiarekin bat etorri. Tekno eremuko klasikoagoa ikusten dut, aldiz gainerako abestiak ikuspuntu moderno batetik eginak izan dira. *Desintoxikazioa* abestia oraindik erabiltzen dugu zuzenekoetan sarrera gisa, oso identifikatzen naiz abesti horrekin, melodia gabekoa dela iruditzen zait, grisa eta iluna, bluesaren parekoa, hala ere, kantua oso sakona da. *Atzerriko neska* ere oso gustuko dut, nire obsesioetako bat baita, atzerritik etortzen denaren atzean zer dagoen, nondik datorren, zergatik dagoen hemen... Pena da zeren eta disko honetako abesti asko, diskoan geratu baitira, batzuetan zuzenekoetan jotzen ditugu baina...”

*“gela handiegi batean, orain bezala, gela handiegi batean,
eta oraindik gogoan dut gela horretan zinela zu,
gogoan zaitut...”*

**MYRIAM GARZIA.** ELGOIBAR, 1968
Musika kazetaria

[ 103 ]



## **PEIREMANS** | PEIREMANS

Bonberenea Ekintzak, 2005

2005eko udaberriaren hasieran *Pasavento doktorea* aurkeztu nuen Donostian. Maria Cristina hotelean tokiko egunkariei bistadizoa botatzen ari nintzaiela, albiste batek jo zidan arreta: hiru musikarik futbolari baten deitura jarria zioten beren musika-proiektuari. Deitura ez zen Zamora edo Bakero —Juan Villoro laguna izen gehiago emateko gai izango zatekeen; ni, ez—, baizik eta Peiremans.

Nor ote zen Peiremans? Horren gutxi nekien futbolaz?

Irakurtzen jarraitu nuen izen misteriotsuak akuilatuta. Hala jakin nuen Errealak 2000ko udan fitxatu zuela Frederic Peiremans aurrelari belgikarra. 600 milioi ordaindu zuen —artean pezetak nituen erreferentzia—. Zoritxarrez, Peiremansek ez zuen sekula partida ofizial bateko segundo bat jokatu. Tortilla baten lez zituen gihar iskiotibialak. 2001eko amaieran, depresioak jota zegoela, konfiantzazko mediku batengana jo zuen. Peiremansek sindrome piriformea zeukan, hots, pelbisa zeharo hondatuta. Ezingo zen berriro futbol-zelai batera irten. Jokalariak ezintasun iraunkorra eskatu zuen. Baita epaile batek eman ere.

Dirudienez, musikariek —Imanol Peiremans, Gorka Peiremans eta Txiki Peiremans, egunkariak zioenaren arabera— galtzailearen figurari erreparatu nahi izan zioten, eta burlaizez begiratu bizitza aldatuko ez zien mundu bati.

Bat etorri nintzen Peiremans familiaren asmoarekin —Trapp familia austriar hartakoak bezain higuingarriak ez izatea ere desio nuen—. Belgika, azken batean, jokalariaren metafora baino ez zen, estatu lesionatua —eta ez bakarrik iskiotibialetan—, herria ez zen luxuzko fitxaketa, forma anitzeko sindromeak jota.

Irakurri ahala proiektuaren sakoneko garrantziaz eta zentzuaz jabetu nintzen: Peiremans desagertzeko munduratua zen. Iraungitze data zuen, horrenbeste gustatzen zitzaizkidan txokolatezko jogurtak bezalaxe. Ezin zen kasualitatea izan. Berriro erreparatu nion fitxaketaren datari: 2000ko ekaina, *Bartleby eta enparauak* argitaratu eta hiru hilabetera.

Liburu hartara eta egun haietara joan zitzaidan gogoa. Obra, beren bizitzaren une jakin batean sortzen jarraitzeko ukoan tematzen diren autoreei eskainia zegoen; arrazoi bat edo beste —eta ez da ziorik eza baino zio hoberik izaten—, *Ez* ilunera murgiltzera erabakitzen dutenei; Rulfo, Salinger eta Rimbaud legezko heroiei.

Leihotik kanpora begiratu nuen une batez gertatzen ari zen guztia hobeto ulertzeko. Peiremans, beste ezertaz baino areago, ukazioaz ari zitzaigun. Proiektu kamusianoa begitandu zitzaidan, bazekien bertute bihurtzen ezetza. Orok gero eta iraupen laburragoa zuen mundu batean, iraute-grinak bizi gintuen.

Peiremansek, ordea, betikotzeari uko egiten zion. Berehala, ezinbestean, Nathaniel Hawthorneren Wakefield eta Herman Melvilleren Bartleby pertsonaiak etorri zitzaizkidan akordura, biak ala biak ukoaren enbaxadoreak.

Ez zen luze joan, bestetik, Peiremansi eta sortzen jarraitzeko uko setatiari esker, ezagutzen nuen idazle belgikar bakarraz ere gogoratu arte: Georges Simenon. Anti-Peiremans hutsa, 192 eleberri eta 1.000 ipuin zituen argitaraturik

—Non eros dezaket *Peiremans*? —galdetu nien harrerako langileei.

Egunkariko berbek zekarten ukazioaren musikak sorgindurik nindukan ordurako. Harreragileek ez zekiten deusik taldeari buruz. Ez bat ez bi hirian galtzera egin nuen. Diskoa behin bakarrik entzutera deliberaturik nengoen.

Gaur Donostiara bueltatu naiz *Dublinesca* azken eleberria aurkeztera. Eguerdian itsasertzean ibili naiz. Kantauriko haize jelatuak hotelera itzultzera behartu nau berehala. Zeregin hoberik ezean, tokiko prentsa irakurtzeari ekin diot. Ohitura dut. Eta bost urte lehenago bezala, beste albiste batek goiti-beheiti astindu nau: Colemans taldea kontzertu batzuk ematen ari da Peiremans zenaren uberan.

Atzera ere irakurri dut albiste profetikoa. Izena Chris Coleman entrenatzailearen omenez jarri dute. Peiremans bezala, Errealera etorria. Eta hura bezala, zoritxarrean ez ezik laburrean ere aditua. Antiheroi petoa. Egunkariaren arabera, Coleman galestarra da, Swansean sortua. Eta orduantxe argi ikusi dut galestarrak ukazioaren artistak direla.

**LUTXO EGIA.** SANTANDER, 1969
Idazlea

**[ 104 ]**

## **DUB WARS** | GROUNDATION



Young Tree Records, 2005

**GAU HARTATIK**
Gauez entzungo zuen lehendabiziko aldiz, diskoa. Berea ez zen logela batean. Bakarrik. Bakardadea horrenbesterako zuloa ere ez zela jakin gabe, artean. Loezinak ohetik altxarazi, eta musika aparailuari sehaska kanturen bat eskatzera zutitu zen. Kirioak baretzeko zerbait, arren. Baina zer, behegainean zeuden CD ezezagun pila haren artetik (Verbatim, TDK, Sony), zein aukeratu? Logela hartan falta zen neskak idazkera kuriosoa zuen. Batzuetan errotuladorez idatzitako izenburu batzuk ageri ziren, forma kiribilduetan; iradokitzaileak, gutxi. Bestetan ezta hori ere: CD izengabeak azpitik marraz beteta. Halako batean, *Dub Wars* irakurri zuen eta, huraxe. Ea ba.

Osorik entzun zuen. Hasieran jaramon handiegirik egin gabe, egia esateko. Gogoa gelatik kanpora. Hutsune-mina sentitzen denero legez, inguruari baino norbere ilun hondo gabeari begiratzen zaionean bezala, batek daki zeren bila (ez errotuladorez idatzitako abisurik, ezta arrakala aztarnarik ere begi bistan). Disko osoa amaitu zenean konturatu zen. Gustatu zitzaiola. Zuloko zulotik tarteka atera eta azaleratzea lortu zuela, entzumenean arreta jartzera; arnas hartzera. Tira egin zion, baina behartu gabe, nazkatu gabe, molestatu gabe, sorbaldan esku arin bat, laztan epela. Ez zion mina baretu, ezta loezina sendatu ere. Baina jakinmintxoa bai piztu zion. Ez zegoen batere gaizki, diskoa. Gainera, oraindik lo hartu ezinik, eta beste egiteko hoberik ez. Berriro entzun zuen ba, beste behin. Osorik. Birritan. Hiru bider. Lau. Bost entzunaldi segidan hasi eta buka bata bestearen atzetik. Ene bada, zer du disko honek.

Hiru nota. Akorde bat. Jaitsi…, eta erantzun. Eta hor doa… Organoa suabe, abestiari nagiak astintzen, gauaren hormetan marrazkiak eginez, oihartzun ñimiñoz zipriztinduta. Kontraerritmo bat airera... Plateren dardara. Bi (-bi bi bi)… Platerek dir-dir. Hiru (-ru ru ru)… Metala izartu. Eta laugarrenarekin batera, badator. Klak! Danbor-kaxan zartadak. Tinbal kolpeak. Bonboa. Eta dunBa. Baxuaren taupadak esnatu dira. Gorpuztu egiten da zuhaitza. Orduan, ahots berezi batek dei, kikuka. Koruak, hostoen arteko zirrikituetatik. Bularra harantz honantz daukala konturatzen da, eta begiak itxi dituela, eta irribarre bat daramala. Belarrietan. Lepo atzeko azalean. Ile puntetan. Hego haizea urrezko adarretan. Danbateko epelak sabelean. Birikak hegoak zabalik. Bihotzak lau soka sakon. Odola, itsasertzean, bare, olatuen magalean, kulunkan, ameslari.

Pantera beltz bat hamakan begiak itxita belar luze bat hortz artean, matxinsaltoek salto, ipurtargiek argi, kilkerrek kir-kir, ontza uluka, apoek kroaka kableen kirrinka hotsari, elefanteak tronpak elkar igurtziz maitasunari, makakoak teklatu gainean kosmonauta jantzita saltoka, marmoka bat, lau, hamaika airean hegaz noten azpian, tximeletak espiraletan isiltasunen gainetik, errinozeroak dun dun dun diotso oinazpiko lurrari, elkarrekin dantzan egiteko, bufaloek marrumm eztarriaren sakonean eta buf, eta lehoiek marramiau…

Zeru izartsu bat itsaso azpian.

Biharamunean CDa ostu zion logela hartara beranduegi iritsi zen neska beltzaran hari. Hurrengo batean emango zizkion eskerrak. Ordutik, zenbat gautan lokartu den sakon bare hondo disko hori entzunez, berak ere ez daki.

* *Groundation (Kalifornia iparraldeko roots reggae dub jazz taldea; hainbat disko gomendagarri ditu).*

** *Ez zion diskoa bueltatu; muxu bat, beltzaranari*

**EKAITZ GOIENETXEA CERECEDA.** MIARRITZE, 1982
Musikazalea

[ 105 ]

## **SNOW BORNE SORROW** | NINE HORSES



Samadhi Sound, 2005

David Sylvian, bere bakarkako *Blemish* disko handiaren ostean, Nine Horses proiektu bezala datorkigu *Snow Borne Sorrow* lanagaz. Diskoa martxan ipinteagaz batera, nire sabelak berotzen dira, galletak kafean bustitzen dodazan bitartean. Berotsu dagoz nire tripak eta orain entzunaldiagaz momentu askotaz gogoratzen naz. Errazten badot eta erroetara banoa gure antzinako arbasoekaz gogoratzen naz. Azken glaziazio luzearen ostean leizetan bizi izandako hareekaz. Zeinen trazu finak, irudi ederrak sortu, margoztu leizen barrualdean (kanpoaldean ikusitako mundu sakratu askearen isla) eta ostera be kanpora, argiaren bila. *Arkumeak* bagara, *ar* zabal horren *(k)umeak* bagara, dana dogu liluratzeko, amesteko… bizitzeko.

Gorputza lasaitu eta gozatu entzutean. Buruari atseden apur bat emon nahian, zuretzako momentu bat hartu erraza ez den mundu izoztu honetan. Beraz, irudimenaren ateak zabaldu eta goazen kanpora eta atzera salto egitera, milaka urte atzera disko honetako kantuen laguntzagaz.

Kanpoan argi izpi biziz apaindutako lur eder honetan, lan honek emoten deuskun beroa eta ikuspegia sentitu eta zabaldu daikegu. Sugarren gerizpeen arteko mundutik at, dana da argitsuagoa, zabalagoa. Edurra mara-mara ari dau. Dana zuri-zuri dago. Diskoaren izenburua *Edurrak jasandako tristezia*-ren edur malutak paisaia kristalizatzen dau. Kristal hotzaren barrualdetik, gure neguko leihotik, garai bero goxo zoroez gogoratzen gara. Eta orain bagoaz..... bagoaz… galapan disko edurtu honetan barna, gure negu ezkutuan, norberaren negu ostenduan sakonduz.

Bederatzi gara. Bederatzi zaldi-kantu dotore. Kolorez, tamainaz, itxuraz ezberdinak. Hori da disko bezala aberasten gaituena. Bederatzi baina bat, osoa, biribila. Kantu-zaldi bakoitzak irudi, gertaera, sentipen, egoera desberdinekaz liluratuko gaitu. Batzuek, liken ezberdinen margo eta itxura ikusgarriekaz; beste batzuek, erreka garden honeen ondoan paratzen diren zomorroen hegoek ataraten dabezan soinu finekaz. Udabarriko loreen margo zein usainaren intentsitateaz, goizeko garoaren freskotasunaz, egunsentia zein iluntzeko argi magikoaz, eguzki ilargiaren arteko maitasunaz.

Baina orain aurrean dekogun naturagaz txunditu eta gero, gu zaldiak, beldurtu egiten gara gure aurrean lezezulotik atara barri diren gizaki horreen aurpegi zurbilak ikusita.

Inguratzen jaken orogaz harritu dira. Kobazulo honen barruan egon dan David Sylvian musikari ingelesa zaldilagun ezin hobeez berotu da disko hau sortzeko. Alde batetik, bere anaia dan Steve Jansen-en perkusioa guztiaren eroalea izan

da. Burnt Friedman musikari alemaniarra (Jaki Liebezeit –Can–, The Nu Dub Players eta beste musikari/talde handiekin ibilitakoa) bere soinu elektronikoekaz ibili da. Diskoan danak dira xehetasunak, ñabardurez jositako uneak. Sylvianen ahots sakonak, erraietara sartzen dan Stina Nordenstamen ahots fin goxoari lekua izten deutso zenbait momentutan. Kontrabaxu eta gitarra apalaren indarra Keith Loweren esku geratzen da. Tronpetek, txoriak lez, Arve Henriksen (Supersilent…) eskutik xuxurlatzen dabe. Saxofoiak, txirulak, klarineteak, Theo Travis, Thomas Hassen eta Hayden Chisholmen esku. Ryuichi Sakamotok pianoa eta abar. Hitzetan,. orokorrean, bizitzaren alderik ilunena azpimarratzen dau, argia hobeto aintzat hartzeko, Tarkovskyk zineman egin izan eban lez.

Askoz gehiago idatzi daiteke *Snow Borne Sorrow* disko honen inguruan. Niri lehenengo entzunaldian harritu ninduan. Entzundako azken diskoen artean berezia eta txukun eginda egoala iruditu jatan. Teknikoki edo musikalki diskoaren hausnarketa ez da oso zehatza izango, baina horixe bera izan da, lan hau aukeratzera eraman nauana. Disko osoaren zehaztasun danak kantetan dagozalako olerki bat osatuz, eta olerkia musika bezala bizi…entzun…sentitu…beharko genduke…

Asko emoten dau diskoak lasaitasunaren hitz-jarioan sakontzeko.

**SENDOA MIRANDA.** SESTAO, 1978
Musikazalea

## [ 106 ]

## ANTHOLOGY | WILLIS DRUMMOND

Autoekoizpena, 2006

Modu askotan iristen dira diskoak norberaren eskuetara: erosita, batzuok oraindik hori ere egiten dugu; internetetik jaitsita, ekidin ezin den bide berria; oparituta, liburuak oparitzea bezain erraza da diskoak oparitzea; lapurtuta, merkataritza gune handiek horretarako aukera ezin hobea ematen dute; utzita, zenbat aldiz oroitu ote gara norbaiti utzi genion eta gero berriz ikusi ez dugun disko hartaz; eta beste modu askotan.

Disko honen kasuan, nire eskuetara iristeko izan zuen modua berezia izan zen. Aitak eman zidan, Baiona inguruko bere lagun batzuen lehen diskoa zela eta irratian jartzeko eta promozio pixka bat egiteko esan zidan. Argitu beharra dago aitaren eta nire zaletasun musikalak nahiko urrun daudela elkarrengandik, oinarrizkoak alde batera utzita. Beraz, diskoa entzun aurretik nuen informazioa kontuan izanda ez nuen esperantza gehiegirik plastiko hark bilduko zuenaren inguruan. Are gutxiago kanpotik ikus nitzakeenak ikusi ondoren: Willis Drummond zen taldearen izena eta *Anthology* diskoarena, azal hori minimalista batean irakur zitekeen bakarra zen, erakargarria zela askotxo esatea izango



litzateke. Disko denda batean taldea ezagutu gabe noizean behin diskoak duen itxuragatik erosten den horietakoa ez zen izango hau behintzat.

Aurrekari horiek alde batera utzita, gogoan dut diskoa entzun nuen lehen aldia. Irratiko fonotekan lasai eserita bizpahiru lagun izango ginen eta aipatu nien diskoa nondik nora iritsi zitzaidan, entzun egin beharko genuen. Lehen segundotik nire aurreiritzi guztiak alde batera utzi behar izan nituen, lagunak ere harrituta agertu ziren, “ez zegok gaizki, hi!”

Diskoa goitik behera entzundakoan inpresioa are hobea izan zen, ez agian diskoagatik beragatik, zeren nahiz eta asko gustatu zitzaidan, argi baitzegoen ez zutela beste munduko ezer egiten; post-hardcorea, stonerra, rock’n’rolla, hainbat estilo nahasten zituzten, eragin nabarmenekin askotan, izan Fugazi zein QOTSA atzerrian, edo Lisabö hurbilago. Baina horren atzetik nabarmentzen zen bazegoela zerbait, indar berezi bat, ahotsetan, oinarri erritmiko sendoetan, abestiek zituzten gora behera horietan, hitzetan…

Berezi jo genuen horretan sakontzeko asmoz, elkarrizketa egin genien eta haren ondotik zuzenean jotzeko gonbidapena ere luzatu genien. Kontzertu hartako kartela irratiko fonotekan dago oraindik, 2007ko ekainaren 19an izan zen, Gasteizko Parral tabernan. Ez ginen asko han bildutakoak, baina sekulako ikuskizunaz gozatzeko aukera izan genuen, diskoan antzematen zen berezitasun hori indar bihurtzen zen zuzenean; pentsa, astearte buruzuri batean denok saltoka eta oihuka bukatu genuen, abesti gehiagoren gosez.

Beraz, beste behin ere, errealitateak nire aurreiritziak pikutara bidali zituen, hasiera batean inongo itxura onik ez zuenak, azken urteotan Euskal Herriko musika erakusleihoan aurkitu dudan sorpresa handienetako bat izaten amaitu du.

Ondorioa garbia da beraz, utzi aurreiritziak alde batera, diskoak jasotzen dituzuen iturritik jasotzen dituzuela, ezer esan aurretik, bolumena igo eta entzun.

**EÑAUT IRAETA ARANBARRI.** SANTUTXU, 1981
Hala Bedi irratiko kidea
halabedi.org

[ 107 ]



## **THE GREAT DEPRESSION** | DEFIANCE, OHIO

No Idea Records, 2006

Geroz eta nekezago egiten zait, lehen ez bezala, zuzenean deskubritzea barrenera iristen zaizkidan taldeak. Duela hamar urte entzuten nuen musika bera entzuten dut egun ere, eta egia esan, ez dirudi aurrerantzean ere aldatuko dudanik.

Oraindik ere ondo oroitzen dut Defiance, Ohio entzutera bultzatu ninduen musika erreseina. Bitxia da, lagun batek idatzi baitzuen, baina ez nekien bera zela hasieran. Taldeak Tolosan (Okzitania) emaniko kontzertuan topo egin genuenean jabetu nintzen horretaz.

Erreseina irakurri eta gero ere ez nuen oso garbi zer nolako taldea ote zen; gustuko nituen taldeak aipatzen zituen erreseinak; Against Me!, Off with Their Heads, Bridge and Tunnel, This Bike Is a Pipe Bomb, etab. No Idea zen zigilua eta hori ere aldeko nuen.

Erreseina irakurri eta gero, hurrengo urratsa sarean informazioa bilatzea eta diskoa lortzeko modua topatzea. Defianceren orrira iritsi eta disko guztiak deskargatzeko moduan zituztela ohartu nintzen (bi zituzten ordurako). Hasieratik usain ona hartu nion taldeari.

Lehen kantuak entzun orduko katigatuta geratu nintzen. Ez dakit oso ondo zergatik, baina lehen entzunaldian ondo sartzen zaizkidan diskoekin mesfidatia izan naiz beti. Eskarmentu kontua izango da ziur aski; gustukoen ditudan diskoetako asko gorrotagarriak izan zaizkit entzundako lehen aldian, eta askotan entzun behar izan ditut gustatzen hasi baino lehen.

Artean entzun gabe genituen diskoetan, dendakoak uzten zizkigun minutu eskas horiek salbu, gastatzen genuen eskupekoa gaztetxo ginela. Azala edo zigilua bezalako gauza arbitrarioek bultzatzen gintuzten disko bata edo bestea

erostera. Diru hori xahutu izanak diskoa ezinbestean gustuko izatera behartzen zintuen. Behin eta berriro entzuten zenuen, harik eta gustatzen zitzaizun arte. Ez dakit ona edo txarra den hori, baina horixe zen egiten nuena. Gaur egun askoz ere errazagoa da musika eskuratu ahal izatea, eta ez dugu taldeei hainbeste aukera emateko joerarik, nik neuk ez, behintzat.

Alegia, diskoa entzun nuen lehen aldirako erabat kateatua nengoen. Disko ona den ez dakit, baina oraindik ere maiz samar entzuten dut eta gustukoa dudala esan nahi du horrek.

Diskoari berari gagozkiolarik, lehenik eta behin onartu beharra daukat musikaz ideiarik ere ez dudala. Gustuko ditudan gauzek bideratzen naute, batzuetan onak izango dira eta besteetan kaxkarrak. Ziur aski gehienetan txarrak izango dira, baina gutxienik ondo pasatzen dut. Nire iritziz musikak lotura handiagoa du sentsazioekin, eta Defiance, Ohio gehiagotan ikusi nahiko nukeen talde horietako bat da, garagardo bat hartuz eta besoak altxaturik koruak ahapeka kantatuz.

Defiance moduren batean sailkatu beharko banu, folk-punk izendapen orokorrak bere baitan biltzen duen ildoan kokatuko nuke. No Idea zigiluaren ildoarekin bat doa Defianceren proposamena, Hot Water Music taldea buru duen korrontearen baitakoa da, baina kasu honetan alderik akustikoenean kokatua.

Disko hau aukeratu izana, taldeak kaleraturikoen artean gustukoen dudana, eurei buruz hitz egiteko aitzakia baino ez da.

Talde bat behar bezala baloratu ahal izateko zuzenekoari erreparatzea ezinbestekoa da. Talde bat asko gustatu arren, gero zuzenean ikustean ezer transmititzen ez badidate, ez dut taldearen musika entzuten jarraituko. Duela pare bat urte biran izan ziren Europan barrena, baina pena izan zen, ez baitziren, aipatu bezala, Tolosa baino hegoalderago joan. Gaztetxe moduko batean jo zuten, eta oso ondo pasa nuen, lehen aipatu bezala, garagardoa edanez eta besoak altxatuta abestiak kantatuz. Diskoak sortzen duen energia oso ondo transmititzen dute zuzenekoan, eta, jendearen erreakzioei erreparatuta, uste dut gehienek antzekoa sentitu zutela. Nabarmentzekoa izan zen, ez dakit taldearen eskariz ala aretoaren beraren filosofiarengatik, sarrera ez zela prezio finko batekoa, baizik eta norberak nahi zuena ordaintzen zuela. Hori azpimarratzen dut, oso zaila delako sei pertsona bira oso batean mantentzea borondatezko sarreren bidez.

*Do It Yourself* filosofiarekin bat egin izan du betidanik Defiancek, eta ez da beti erraza izaten ideia horri leial eustea. Beraien lehen diskoak Plan-It-X Records zigiluarekin plazaratu zituzten, zeina New Yorkeko DIYren adierazle nagusienetakoa den. Zigilu horren inguruan *If It Ain't Cheap, It Ain't Punk* (Ez bada merkea, ez da punka) izenburupean egin duten dokumentala ikusteko gogoz nago. Izenburuak ondo laburbiltzen du dena.

No Idea Records zigiluak Defiance fitxatu zuenean, taldeak komunikatu bat plazaratu zuen aldaketaren arrazoiak azalduz. No Idea Records ez da diskoetxe multinazional bat, baina Plan-It-X Records baino dezente handiagoa

da. Kritikaren sektore batek ordurako saldutzat jotzen zuen taldea, baina beraiek banaketa arrazoiak azaldu zituzten, eta beraien bilakaera ikusiz gero, ez dirudi gezurretan ari zirenik. Taldearen beste ezaugarrietako bat da ez dutela *merchandising*-ik egiten, Dischord Records zigiluaren molde berean. Beraien elastiko bat nahi izanez gero, zuk duzun edozein bidaltzeko eskatuko dizute, gero beraiek unean okurritzen zaiena estanpa diezazuten. Ondoren bueltan bidaliko dizute elastikoa.

Enfin, musikaz ez dut apenas hitz egin, beste zenbait gauza nabarmendu nahi izan ditut, akaso nire iritzia sendotzeko edo justifikatzeko, egiten duten guztian eta musikan duten koherentzia azpimarratzeko. Onena beraien web orrira joatea eta beraien diskoak jaistea da. Gustukoak badituzue seguru esker oneko azalduko direla aleren bat erosten badiezue. Beste behin gure ingurura etor daitezen espero dut.

Bukatzeko, kantu bat: *Calling Old Friends*.

**TXESMA LASA.** DONOSTIA, 1981
Errealizadorea
hervidero.es

.**[ 108 ]**

## **LE DÉSERTEUR** | BORIS VIAN

Mercury, 2006 (bilduma)

**DESERTOREA**
Ziur aski, Boris Vianen *Le déserteur* gerraren aurkako inoizko abestirik ezagunena da. Eta hala ere, ez da hainbesterako azken bertsoei erreparatuta, autorearen lehenengo bertsioan honako hau baitzioen: "*Ohartarazi zure jendarmeak, armatuta egongo naizela eta gainera badakidala tiro egiten*". Hori zela eta, ez zen hain aldarrikapen *bakezalea*, zentzu zorrotz eta zehatzenean.

Boris Vianek adierazi zuen gerraren aurkako kantuak egin egin daitezkeela, baina bakezale terminoak ez dakarrela berarekin borroka armatuari uko egitea, eta zalantzarik gabe, Frantziako gobernuak garai hartan Indotxinan (Vietnam) egiten zuenaz ari zen, edota Aljerian abiatzen ari zenaz, indar independentistak frantziarren okupazioaren kontra balentriaz ari baitziren borrokatzen. Gatazka haren lehenengo hilabeteetan desertzioak oso ohikoak ziren, gaur egun Iraken AEBetako armada mertzenarioan gertatzen ari direnak bezain ohikoak.
*Le déserteur*-en eskuizkribua 1954ko otsailekoa da eta urte bereko martxoan estreinatu zuen Europa 1 irratiak. Aljerian jaiotako Marcel Mouloudji interpreteak abestu zuen (autorearen bertsio originala zenbait hilabete geroago grabatuko zen, 1955ean), baina azken bertsoak aldatuta: "*Ez daramat armarik, jendarmek beldur barik nazaten tiroka*". Garai hartan autoreak egingo zituen ondorengo

aldaketak gorabehera (*Presidenteari* egiten zizkion aipamen guztiak barne, "*Monsieurs qu'on nomme grands*" –handitzat hartzen diren jaunak– esaeraren truke), gobernuko maila gorenetan debekatzeko erabakia hartu zen. 1955eko urtarrilean, Pariseko udal-kontseilari batek, Paul Fauberrek, agintari eskudunen aurrean salatu zituen kantuaren testua eta autorea. Ondorioz, desertorearen kantua ezingo zen irratian jarri, aitzakia edozein izanda ere.

Ohi zuen legez, ironia finez eta sosegu handiz erantzun zuen: "Nire kantua ez da inolaz ere antimilitarista, pro-zibila da bortizki". Eta aipatutako funtzionarioari gutun ireki bat bidali zion, eta bertan, besteak beste, honako hau zioen: "Bai, Faber jaun agurgarria, zuk badakizu karrerako militar zenbaitek uste dutela gerraren helburu bakarra jendea hiltzea dela". Baina agintariak gehien asaldatu zuena honako paragrafo hau izan zen: "*Aspaldiko borrokalaria* kontzeptu arriskutsua da, ez baita egokia gerran aritu izanaz banaloriatzea, bertan parte hartu izana deitoratzea litzateke egokiena. Aspaldiko borrokalaria gerra gorrotatzeko arrazoi gehien dituena da, benetako desertorea borrokaren amaieraraino heltzeko indarrik izan ez duen aspaldiko borrokalaria baita. Baina nork jaurtiko ote die lehenengo harria? Ez naiz ni izango. Nire kantua norbaiti ez gustatzekotan, aspaldiko borrokalaria ez denari ez zaio gustatuko, Faber jauna." 1959an zendu zen Boris Vian, bere kantuaren gaineko debekua indarrean zirauela.

Irrati, telebista eta diskoetxeetako boikot eta zentsurak gorabehera, *Le déserteur* ez zen ahaztu. Arestian aipatu dugun Mouloudjik lehenbiziko aldiz abesteko ausardia izan zuen, eta ondorioz, zigor profesional ikaragarria jasan zuen eta erbeste artistikora ihes egin behar izan zuen 1968. urtera arte, orduan hasi baitziren kantuaren bertsioak agertzen nazioarteko beste artisten diskografietan; esaterako Peter, Paul & Mary eta Joan Baez (AEB), Sergio Endrigo, Luigi Tenco eta Ornella Vanoni (Italia), Leonard Cohen (Kanada), Richard Anthony, Serge Reggiani, Eddy Mitchell, Leny Escudero, Hugues Aufray, Michel Piccoli (Frantzia), Esther eta Abi Ofarim (Israel) eta abar.

Gaur egun kalkulaezina da zenbat hizkuntzatara izan den itzulia lan berezi hau, baina ezaguna da *Internazionala, Rivers of Babylon* edo *My Way* kantuak baino gehiagotara itzuli izan dela, nahiz eta irratietan gutxiagotan entzungo duzun. AEB, Alemania, Australia, Polonia eta Erresuma Batuko mertzenarioek Iraketik atera arte, neoliberalismoak Ipar Atlantikoko Erakunde Terroristaren (NATO) bidez zibilak hiltzeari utzi arte, Espainia borboizale eta neofrankista honetan egon diren gobernu guztien laguntzarekin, lehenengo munduko inbaditzaileek gu mehatxatzeari uzten dioten arte berena den eta beraiek fabrikatzen eta manipulatzen duten terrorearen aurka, mundu hobea posiblea izan arte, zabal ditzagun hau bezalako kantu eta testuak. Borroka baketsuaren unea da, gudu adeitsuarena, datozen belaunaldiek ez dezaten ahantzi harribitxi xalo, distiratsu eta merkeak existitzen direla, ohorezko desertore hau bezainbestekoa, desertatua plazeragatik erailtzen duen armada horretatik: neoliberalismoarenetik.

Hementxe ditugu hitzak, Koldo Izagirreren itzulpenarekin batera:

| | |
|---|---|
| *Monsieur le Président* | *Lehendakari jauna* |
| *Je vous fais une lettre* | *Otoi hartzazu astia* |
| *Que vous lirez peut-être* | *Letzeko bidalia* |
| *Si vous avez le temps* | *Dizudan gutuna* |
| *Je viens de recevoir* | *Goizean zait heldu* |
| *Mes papiers militaires* | *Soldadutzako deia:* |
| *Pour partir à la guerre* | *Gerran behar dut lehia* |
| *Avant mercredi soir* | *'ta nadila gertu* |

| | |
|---|---|
| *Monsieur le Président* | *Jaun txit bihotzeko* |
| *Je ne veux pas la faire* | *Ez dut gerrarik gura* |
| *Je ne suis pas sur terre* | *Ez naiz jaio mundura* |
| *Pour tuer des pauvres gens* | *Inoren hiltzeko* |
| *C'est pas pour vous fâcher* | *Ez zaitez haserra* |
| *Il faut que je vous dise* | *Baina jakin ezazu* |
| *Ma décision est prise* | *Desertore noazu* |
| *Je m'en vais déserter* | *Ez dut maite gerra* |

| | |
|---|---|
| *Depuis que je suis né* | *Sortu naiz aidanez* |
| *J'ai vu mourir mon père* | *Aita lurperatzeko* |
| *J'ai vu partir mes frères* | *Senideak uzteko* |
| *Et pleurer mes enfants* | *Haur denak negarrez* |
| *Ma mère a tant souffert* | *Amak zenbat malko* |
| *Elle est dedans sa tombe* | *Bonben beldurrik gabe* |
| *Et se moque des bombes* | *Harren beldurrik gabe* |
| *Et se moque des vers* | *Hilobian dago* |
| *Quand j'étais prisonnier* | *Preso nintzelarik* |
| *On m'a volé ma femme* | *Neska zidaten kendu* |

| | |
|---|---|
| *On m'a volé mon âme* | *Nire arima irendu* |
| *Et tout mon cher passé* | *Ez dut iraganik* |
| *Demain de bon matin* | *Bihar goizaldean* |
| *Je fermerai ma porte* | *Hementxe ate joka* |
| *Au nez des années mortes* | *Urte ustelen tropa* |
| *J'irai sur les chemins* | *Baina ni bidean* |

*Je mendierai ma vie*
*Sur les routes de France*
*De Bretagne en Provence*
*Et je dirai aux gens:*
*Refusez d'obéir*
*Refusez de la faire*
*N'allez pas à la guerre*
*Refusez de partir.*

*S'il faut donner son sang*
*Allez donner le vôtre*
*Vous êtes bon apôtre*
*Monsieur le Président*
*Si vous me poursuivez*
*Prévenez vos gendarmes*
*Que je n'aurai pas d'armes*
*Et qu'ils pourront tirer*

*Banoa eskeko*
*Limosna baten galde*
*Frantzian aldez alde*
*Ozen esateko:*
*Egiozu uko*
*Gerrara ez joan inora*
*Ez hadila enrola*
*Ez zaik damutuko*

*Odolik behar bada*
*O jaun gerrazalea*
*Emantzazu zeurea*
*Lehendakari jauna*
*Hona azken nota:*
*Ez daramat armarik*
*Jendarmek beldur barik*
*Nazaten tiroka*

**CARLOS TENA.** MADRIL, 1943
Musika kazetaria
tenacarlos.wordpress.com

.**[ 109 ]**

## **EZLEKUAK** | LISABÖ



bIDEhUTS, 2007

*Ezlekuak* atera zen garaian gauza ugarik itotzen ninduen eta kontzertuak gauza horiek saihesteko modu bat bilakatu ziren. Ez zegoen herritik ihes egiteko aitzakia hoberik. Aroa deitu, Lisabök non jotzen zuen begiratu, zakua eta piknika prestatu, furgoneta hartu eta bideari ekin. Prestaketa lan guztiak zirraragarriak ziren, baina zuzenekoaren unea iristen zenean benetako emozio leherketa bat izaten zen. Soinu haiek guztia ahantzarazten zidaten. Plazera, negarra, nostalgia nahastuta... Zentrifugatzen ari den garbigailua bezalakoa izaten zen.

Baziren Orkatz tabernan lan egitea tokatzen zitzaidan asteburuak. Taberna klase ugariko bilkura anitzen topalekua zen. Bertan musikak beti garrantzia izan zuen eta Lisabö edozein momentutan entzun zitekeen.

*Ezlekuak* diskoaren bira bukatu eta gutxira Orkatzen garaia ere amaitu zen. Taberna itxi behar izan zuten eta guztiak pixka bat umezurtz geratu ginen, hainbeste maite dugun musika non entzun jakin gabe. Aldaketa unea zen.
Lisabö lokalaren babesera bueltatu zen. Ionyuk taldea uztea erabaki zuen eta

Xabik hartu du bere lekua. Orain zuzeneko berrietarako grina handia dut. Xabi alboan edukitzea asko botako dut faltan, baina ikaragarri poztuko nau hainbeste gustatzen zaion taldearekin jotzen ikusteak.

*Ezlekuak* beti izan da garrantzitsua niretzat. Hainbesteko indarra duten bi bateriak, gitarren negarrak, baxuaren sostengua eta ahots lazgarriak. Baina ez hori bakarrik. Gauzak adierazteko Martxel Mariskalen hitzek duten zorroztasuna ere badago. Guzti horiek batera benetako altxorrak diren kantuak osatzen dituzte. Entzuten ditudan bakoitzean bizkarrean zehar hotzikara bat sentiarazten didaten sentimendu kontrajarriez beterik dauden kantuak.

Disko bat aukeratzea proposatu zidatenean ezinezkoa iruditu zitzaidan, asko eta asko etortzen zitzaizkidalako burura. Baina gutxi dira *Ezlekuak* bezala hasieratik bukaeraraino gustuko ditudanak. Batzuetan gainera ez da oso urrun jo behar harribitxiak topatzeko. Eta bizi naizen gure badia hau musika oso ona egiten duten artistez beterik dagoela uste dut.

Disko hau mugarria izan da nire bizitzan.
Eskerrik asko, Lisabö.

**RUTH SANCHEZ UZKUDUN.** IRUN, 1977
Musikazalea



**[ 110 ]**

## **EL TRAJE VACÍO** | MALCOLM SCARPA



Sponja Records, 2007

2007ko udaberrian bi disko grabatzeari ekin zion Malcolm Scarpak; *Un buen día lo tiene cualquiera*, Santiago Lorenzoren filmaren soinu banda, eta aukeratu dudan hau, *El traje vacío*.

“Es un disco morboso”, komentatu zuen Scarpak duela gutxi honi buruz. Ez horrenbeste, baina gaixotasunekiko zerikusi handia ere badauka, haren kantuetako lexikoa aztertzen badugu: horra hor, nola agertzen zaizkigun *tumba, dolor, necrosis, hospital, carcamal, mórbida* eta horrelako hitzak, Poek erabiliko zituenak amodio eta heriotzari buruzko ipuinetan.

Hala ere, gaixotasun baten gorakoa da: bizi izatearen sekulako minak sortarazten diona. Eta zentzu honetan, diskoari hasiera ematen dion *Según los espectros* kantuak, free jazzean murgildu behar zuen bat-batean, sarrera country baten tristezia aldera utziz, gaixoa larrialdietako aldera eramateko. Horrexegatik kantuaren hitzak: zelan maneiatu behar dugun eria (“*jamás introduzca un hueso dentro de la piel*”).

Baina bizitzeko gaixotasunaren minak, heriotzarantz hurbiltzen gaituenak, hamaika era desberdin aukera ditzake: bolero batena, esaterako, galtze berri baten osteko malenkonia deskribatuz (“*cuando algo se rompe y los recuerdos quieren bailar”, Art Decó*). Edo *vodevil* batena, atxikimenduaren biharamuneko prezio altuegia erakusten duenean, nahiz eta Chaplinen mozorroz jantzi (“*y mi cara es color fucsia*”, Color fucsia). Edo Hank Williamsen vals mantso baten antza, *La Miserycordia* (sic) (ez dugu aztertuko hitz jokua), hain zuzen ere, non Bilboko Zahartze Hospizio zaharra haluzinazio antzezleku bilakatzen den, heriotzaren deialdia gertuegi dagoela jakinarazteko: “*Las hojas en el estanque caen / Se mueven pero están muertas / Veo el hospital con más claridad / cuanto más es la oscuridad / Ventanas con luz de ojos cuadrados / en la Miserycordia, en Bilbao*”.

Tarteko lanbrotsu horretatik ihes egiteko era hobe dugu antzinako parajeak bisitatzea, eta horrela eramaten gaitu Malcolmek bidean zehar. Izan ere, hor daukagu *Nelly* instrumentala; bertan amodio berri baten lehenengo egunak lirismoz tindaturik agertzen zaizkigu. Halaber, egunerokotasunak uneko eroskundea ekarri ahal digu, bai kabaret kantu baten mozorroz, ikuspegi umoretsu batetik (“*Ésta canción es para las Secretarias / que cuando tienen que estar siempre han salido a por agua*”), edo countryaren esku malenkoniatsutik (“*Pequeño lápiz negro / me recuerdas a mí / ahora que estás gastado / sin punta para escribir*”). Honen truke, samurtasun pittin bat ere eskatu eta eskaini nahi liguke Scarpak, haurtzaroari so egin ostean; horra hor, *El paseo de Begoña*, agian diskoaren kanturik esanguratsu eta larriena, Chaplinen gerizpean kokatzen dena, heriotzaren kiratsen ondoan (“*Murillo / no se ría del niño / Murillo / no se ría del niño / no le preguntes más / no se ría más de él*”).

Eta diskoa ixteko izenburu berbereko kantua agertzen da, *El traje vacío*, *ubi sunt?* antzinako topikoa berpiztuz: zer gertatzen da traje batekin haren jabea hil egin denean; non bukatuko ote da? Berriro ere Hank Williamsen gerizak eramaten gaitu bidean zehar, amaigabeko edota, aldi berean, bide amaituan ("*Al traje vacío le llega su adios / cuando a él y a su dueño vivían los dos*").

Ordutik hona, eta bestalde, beti bezala, Scarpak haren bidexka bakartiari eutsi egin dio. Hirian agertu ohi da, bere Framus zahar zaharrarekin eta botikaz beteriko poltsa minimo batekin, haren errepertorio itzeletik grabatu ez dituen kantu berriak eskainiz (*La alfombra mágica, Laura*…) edo antzinako maketetan grabaturiko bitxiak eta, alproja-zuloak, Hankek kantatzen zuen bezala, on fire ipiniz, duela bi aste bainuetxe batean gertatu zen bezala. Eta Lucero boxeolariak Houstonen *Fat City* filmean egiten duen gisara, jipoia jaso ostean eta dirua kobraturik, Madrilgo autobusean bueltatzen da Framus zahar–zahar eta bidaia poltsa minimo horrekin botikaz urritua.

**EDU DE MUJIKA.** BILBO, 1968
Musikazalea

**[ 111 ]**



## **THE FLYING CLUB CUP** | BEIRUT

Cup Ba Da Bing!, 4AD, 2007

Duela hiru urteko igande goiz batean deskubritu nuen Beirut. Txepel eta epiko samar ematen badu ere, lehenengo kantu hura (*Nantes*) lehenengoz entzuten ari nintzen bitartean, bizitzan behin bakarrik edo inoiz errepikatuko ez diren une magiko horietako bat zela sentitu nuen. Beti izan dut buruan sentsazio magiko horiek *atzematea*, gure bizitza osoan agertzen zaizkigunak; eta ondo esan dut *sentsazioak atzematea*, premia dugun uneetan kutxa zabaldu eta oroitzapen onak, bakea, lasaitasuna, goizeko ihintza, hondartza bakarti bateko itsas brisa, kafe egin berriaren usaina ateratzeko; horiexek baitira disko honek burura ekartzen dizkidan sentsazioak, *in situ* bizitzeko beharrik izan gabe; horregatik guztiagatik *Flying Club Cup* magikoa izan da niretzat. Alde batetik, kasualitatez deskubritu nuelako eta, bestetik, bake eta ametsezko uneak berreskuratzeko aukera ematen didalako. Gainera, frantsesezko interludioa liluragarria iruditzen zait.

Disko honetan *gutxiago gehiago da* premisa bete egiten da; *Penalty*, adibidez, ukelele eta ahots hutsez hasten da, sentimendu eta bibrazio onak transmititzen ditu, irudika dezakezu Mediterraneoan zaudela ilunsentian belaontzi batean nabigatzen, azken eguzki izpiek zerua distirarazten dutela, edo mendixka batean zaudela, biziraun nahian bestelako ilunsentien bila doazen hegazti migratzaileei begira. Nire ustez, diskoko kanturik onena da, hiru minutu baino gutxiago irauten du, baina perfekzioa da, abesti bihurtutako perfekzioa.
Badago beste kantu bat, sentsazio nahaspila sortu izan didana beti: *Un dernier*

*verre*. Alde batetik, izenburuari eta lehenengo ahapaldiari erreparatuta, agur une triste bat dakarkigu, sarrerako ahotsak eta pianoak tronpetei egiten diete bidea, horiek baitira Beiruten ardatza. Kantuaren amaierak pentsarazten digu bizitzari baikor begiratu behar diogula.

*Forks and Knives* kantu positiboa da, oso gustuko dudan kutsu balkanikoa dauka, frantziar Britainiako edozein herriren deskribapen perfektua irudikatzeko aukera ematen du. Konparazio erraz bat egitearren, Balkanetako *Mary Poppins* dela esango nuke.

*A Sunday Smile*-k kantua baino ereserkia dirudi, handientsua, dotorea eta hordigarria, bestondoa eta zoriontasuna ekartzen du gogora.

Nabarmendu nahi dudan beste kantu bat *Flying Club Cup* da, diskoari izena ematen diona. Nire ustez, amaiera alai eta metaforikoa da, ez da gaitzik onik ez dakarrenik, bizitzaren alde onari begiratzen ikasi behar da.

Azkenik, album sakon honi buruzko hausnarketa honi amaiera emateko esango nuke musikari esker eta Beirut bezalako taldeei esker beti dela posible bizitza modu erlaxatu, sakon eta magikoz ulertzea.

**MARTA ROSELL.** BILBO, 1977
Musikazalea

**[ 112 ]**

## **THE SHEPHERD'S DOG** | IRON & WINE



Sub Pop, 2007

Mezu elektroniko bat jaso nuen, eta erantzun egin nuen, harrituta. Egun hartan The Dream Syndicateren *The Medicine Show* diskoaren bertsio bermasterizatua ari nintzen entzuten, oparitu berri zidatena, eta pentsatu nuen disko hura ez zela aukera txarra izango proiektu honetarako, oroitzapen errepikaezinez beterik baitago. Hala ere, egunek aurrera egin ahala, nire buruan titulu gehiago pilatzen ziren, eta zerrenda bat egitera ere iritsi nintzen. Azkenean apurtu egin nuen, dudatsu samarra bainaiz. Jakina, nabarmen nezakeen disko ugari dago, hamarnaka, ehunka. Baina ez nuen gehiegi ere pentsatu nahi, nire intuizioa lurperatuta gera ez zedin. Lokartu aurreko minutuetan, irudiak metatzen zaizkidan unean, gerora marraztu behar ditudan zirriborroak irudikatzen ditudanean, horrelako uneren batean hartu nuen erabakia. Nik ondotxo dakit Iron & Wine taldearen *The Shepherd's Dog* disko garrantzitsua dela nire bizitzan.

Musikak ahalmen oroitarazlea dauka, ezbairik gabe. Hunkitu zintuzten hainbat kantuk behin eta berriz hunkitzen zaituzte, iraganeko egoeretara eramaten zaituzte, elkarrizketa biziak gogorarazi, kontzertu zaratatsuak, bidaiak edo abentu-

rak. Zalantzarik gabe, disko honek etorkizunean oraintxe nagoen une honetara ekarriko nau, bidegurutze askotatik igaro ondoren, hurrengoaren zain, lasai eta burua hodeietan. Hauxe da azken urtean lagun izan dudan musika. Hau nire urterik apurtzaile eta aldakorrena izan da, ametsen bila joan eta ilusioak eraiki ditudan urtea. Horrexegatik entzuten dut hainbestetan. Behin eta berriz. Bata bestearen ondotik.

Denboraren poderioz maiteago dut xuxurla nazaten oihuka nazaten baino, eta uste dut zerikusia duela horrekin. Sam Beamek ezin hobeto egiten du hori. Murmuriotan murgiltzen ditu bere konposizio guztiak, opari hauskorra biltzen duen zetazko paperaren moduan, forma, irudia agerian utziz eta kantu bakoitzaren hauskortasuna nabarmenduz. Berdin dio hemen akordeoi bat agertzen den, teklatuak, biolinak edo bestelako instrumentazio oparoak; nire etxeko egongelan jotzen arituko balitz bezala jarraitzen dut entzuten. Disko hau hurbila eta sentimentala da. Arnasa entzuten da, poesia, ekoizpen urriaren xehetasunak, soinu apalaren bila doa eta leiala da abestien hezurdura akustikoarekiko.

Lehenengo kantua, *Pagan Angel and a Borrowed Car* errepidetik bidaiatzeko gonbidapena da; urrunetik Dillard & Clark eta Flying Burrito Brosen oihartzunak datozkit. Baina beharbada nire irudipena da. Geroago, aurreko lanetik hurbilago doan ibilbidean murgiltzen da, *indie-folk* ezaugarriekin lotuago, derrigorrezkoa dirudi-eta, *House by the Sea* kantu iradokitzailera edo *Innocent Bones*-en erritmo epelera iritsi arte.

*Resurrection Fern* abestiak kontenplazio-moduan jartzen nau, pentsarazten dit, leihotik begiratzera bultzatzen nau, euriari begiratzera, tristezia poetikoz gainezka dago. Disko osoko abestirik mistikoena, tenpluko ereserkia. Eta *Boy with a Coin* iritsi da, irudien segida bat, ipuin bat osatzen duena, nire gozamenerako. Lehenengo akordeek eta akople txikiek burua mugiarazten didate, errituala bailitzan. Musika ahituz doanean diskoaren amaieran, forma berezirik ez duen melodia bihurtuz, Sam Beamek *Flightless Bird, American Mouth* abestiaren lehenengo hitzei ekiten die, gitarra eta pandereta biluzien erritmora, eta mendean hartzen zaitu, mamuari arima emanez berriro.

Askotan, amaitzen denean, berriro has dadin uzten dut, hasiera-amaiera sentsazioa galduz, eta musika zirkulu erara entzutera behartuz. Egunak, urteak eta bizitza zirkulutan doalako, pentsamenduak ere bai. Eta oraindik harrituta nago, gaztetan ez bainuen sekula imajinatuko nire burua akordeoiak edo biolinak dituen musikarik entzuten, edo folk amerikarraren oinordea den musikarik, antzina hitzak berak destainazko keinua eragiten baitzidan. Baina teloiak itxiz doaz eta eszenatokia aldatuz doa, eta hala egiten du musikak ere.

**ESTIBALIZ HERNÁNDEZ DE MIGUEL.** PORTUGALETE, 1970
Ilustratzailea, blogaria
pintameldia.com

**[ 113 ]**



## **ALBERTO MONTERO** | ALBERTO MONTERO

Greyhead, 2008

Eteneko Ibonek disko baten inguruan idazteko proposamena egin zidanean, Alberto Monteroren diskoa aukeratu nuen bi aldiz pentsatu gabe. Ziur asko, Valentziako Erkidegoan gaur arte grabatu den diskorik bikainenetako bat da. Zenbait arrazoik bultzatu naute aukera hau egitera: lehenengoa, folk-rock lan aparta da, eta gure herrian ez dago halako askorik azken urteotan; bigarrena, Albertoren hurbiltasuna eta sinpatia, zinez mutil maitekorra da eta; hirugarrena, nire irratsaioan urteko disko nazional nabarmena izendatu nuen 2008an; eta laugarrena, Juan Pedro *Greyhead*-en apustu handia, disko hau ez baitzetorren bat inondik ere une hartako komertzialtasunarekin. Azken batean, arrazoi horiekin eman nahi izan diot sekulako lan honi zor zaiona.

Hitz egin dezagun labur Alberto Monterori buruz, musikaren independentziatik egiten duen lana nabarmentzeko modukoa baita. Gitarrista honek zehaztasun handiz zaindu ditu bere disko guztiak, eta pluralean diot, album honetaz gain beste bi disko baititu argitaratuak Shake rock taldearekin. Gainera bikoitza da Albertoren eginahala, ez baitzen Valentzia hirian bizi eta, bai Shake taldearekin bai bakarka, hiriburuan kontzerturen bat izan duenean zalantzarik egin gabe etorri izan da. Azken hau diot nire esperientzia propioagatik: bi aldiz eskatu izan diot bere diskoa lagun batzuentzat jotzeko eta halaxe egin izan du. Bestalde, aipagarria da Albertok duen musika ezagutza zabala. Ez da arraroa bere kontzertuetan bertsio liluragarriren bat entzutea, esaterako Robert Wyatten *Rock Bottom* diskoko abesti batena, oilo ipurdia jartzen didana. Pedigridun eraginak, Albertok bere egiten dituenak. Aipatzekoa ere beste hizkuntzetara egokitzeko duen gaitasuna, ingelesez kantatzen duenean gaztelaniaz bezain biribil geratzen direlako abestiak.

Alberto Monteroren disko honetaz hitz egiteko, argitaratu zen urtera arte egin behar dut atzera. Juan Pedrok helarazi zidan irratsaioan aurrerapen bat egin nezan eta *We Are What We Think* pintxatu nuen. Lehenengo akordeak entzun bezain laster konturatu nintzen disko goxo eta berezia izango zela. Diskoaren azalean ageri den irudiak erakusten du disko pertsonala dela: musikariaren aurpegiaren zati bat ikusten da gitarraren zulo txikitik begiratuta. Gainera 2008. urtetik nahi dut abiatu, espainiar folkarentzat urte itzela izan zelako: Albertoren diskoaz gain Cuchilloren lan homonimoa kaleratu zen. Biak ala biak dira ezinbestekoak eta bitxiak, nire ustez, hainbeste elektro-pop, noise eta pop-rock nazionalaren artean.

Albertoren lanik pertsonalena bada ere, luxuzko kolaborazioak ditu. Haien artean, nabarmenenak Valentziako eszenako Junquera anaiak dira, Marcos *Betunizer* Junquera eta Fernando *Negro* Junquera. Garai hartan, beste proiektu ikusgarri batean zeuden murgilduta, Estrategia Lo Capton, alegia. Berehala animatu ziren beren lagun eta diskoetxeko kideari laguntzera. Zer gehiago eska dakioke disko bati? Sasoi betean dagoen musikari bat, sasoi betean dauden beste birekin batera.

Arestian aipatu dudan bezala, ingelesa erabiltzen du Albertok disko osoan. Diskoa argitaratu ondoren komentatu zidan gaztelaniarekin ari zela lanean. Hizkuntza gorabehera, diskoaren kontzepzioa mediterraneoa da. Valentziako eta Murtziako lurraldeetan sortu eta grabatua izan zen. Juan Pedrok Murtziako Alhamara eraman zuen Alberto Montero diskoa ekoiztera. *Love Nest* ahul eta laburrak zabaltzen du grabaketa, eta bidea ematen dio *The Horizon* kantuaren hasierako punteoari, ondoren bateriak eta koroek protagonismoa hartzeko, kantuari bultzada handia emanez. Berehalakoan, *Clear* dator, eta berarekin barealdia eta beste elementu bat: celloa, Albertoren ahots pitzatuari bizi berria ematen diona. *I Don't Know Enough* eta gero diskoko momenturik gorenetako bat dator *We Are What We Think* bikainarekin, flautari lekua egiten diona. Ziur aski, disko osoko kanturik biluzienetako bat. Albertok kantatzen ez duenean flautak hartzen du protagonismoa. Eta horrelaxe doaz aurrera minutuak A aldea *Bees and Butterflies*-ekin amaitu arte. *Alejandra* eta *Sense of Life* kantuek ematen diote hasiera B aldeari, introspekziorako beste buelta bat, bidaiaren bigarren zatirako sarrera moduan. *Sense of Life*-ko amaiera elektrikoa akustikoarekin gurutzatua Beatlesen *Let It Be*-n egon zitekeen, baina zenbait hamarkada beranduago agertu zen, disko honetantxe. Orduan, diskoko beste une folk berezienetako bat dator, Incredible String Band-en *Moonlight* bezalako diskoak gogora dakartzana, zure aurpegian islatzen den eguzki-izpi bat. *Ocean Waves* eta *The Fear* album pertsonalaren kontzeptuaren erakusgarri dira, abeslariak bakarka ekiten baitie abestioi. *Garden* eta *End of a Dream*-en iluntasunak soinu-bidaia honi amaiera ematen dio

Labur esanda, denboraz kanpoko klasiko bat izateko ezaugarri guztiak biltzen dituen diskoa da. Bost axola duela hogeita hamar urte agertu izan edo atzokoa izan, ez baitu iraungitze-datarik. Egidazue kasu eta gehitu zuen bildumara. Eragozpen bakarra, bostehun kopia baino ez ziren argitaratu eta ez dakit baten bat geratuko ote den salgai.

**ANTONI AURA GÓMEZ.** VALENTZIA, 1977
Musika kazetaria
Interfase irratsaioko zuzendari eta aurkezlea
tv.upv.es/

**[ 114 ]**

## **SONGS IN A&E** | SPIRITUALIZED




Universal/Sanctuary, 2008

Musika hasi, eta badirudi zerua zure gainean zabaltzen dela, hasiera orkestratu horrekin ongi etorria emanez bezala. Honek jada bihotzean zirrara antzeko bat sorrarazten du, sakon sakonera eramaten baitute abestiek pixkanaka, edo alderantziz, sakoneko iluntasunetik argirantz.

Segituan entzuten da diskoak kontatzen duen bidaia horretan aurrera egiteko borrokaren arnasa, inguruko mamuak dirudien ahots koralak uxatu nahian. Abestiek, batzuetan, bizitzan aurrera egiteko urrutira entzuten den laguntza eskakizun oihu baten antza hartu arren, bestetan, azkenean norberak bere gorputz, buru eta egoerarekin, hau da, norberarekin dituen eztabaida bakartiak dirudite. Piano teklek baieztatzen dute.

Diskoa amaitzean, ohartzen zara baduela itxaropen ukitua, aurrera egitea pisutsua gertatzen den momentuetan aurrera egitera bultzatzen zaituen indarraren ukitua. Indar horren seinale, abesti batzuetan sumatu daitekeen ezinaren ondoriozko errabiaren garrasiak. Edo, etsipenetik gertu egon daitezkeen doinu goxoagoak. Zaila baita galtzen ari zarela sentitzen duzunean borrokan segitzea.

Nahiz eta barruko ezinak eta amorruak munduaren aldrebeskeria irudiarazi, bizitza zurekin tranpetan jolasean ariko balitz bezala, bada zeozer bizitza honetara, hari batekin bada ere, sendo lotzen zaituena. Eta berriro zerua buru gainean zabaltzen dela dirudi, baina ez bertarako gonbidapena eskainiz, lurreranzko itzulia baieztatuz baizik, beste aukera bat ematen dutelarik bertako ahotsek.

Eta badirudi zerbaiten amaiera iritsi dela, edo hasiera, edo jarraipena. Eta hor jarraitzen du ondoan pertsona horrek, zure gorabeherak onartuz, zure itzuleraren zain, nahiz eta aurrean zaituen. Eta momentu horietan ondokoaren presentzia zein garrantzitsua den sentitzen duzu, beti bultzadatxo bat emateko prest, ondoan esertzeko, entzuteko, konpainiarik behar duzun galdetzeko prest, zuk zure buruari galderak egitea ezinezkoa duzun horietan.

Noizbehinka bidaia horretako borrokaren arrastoak itzuli ohi dira, damuaren modura agian. Behin norbera hausten edo galtzen denean, dena suntsi dezakeela uste denean, zaila izaten baita sentsazio hau azaletik kentzea, beldurrak ere orbainetan sakonera sartzeko bidea aurkitzen baitu.

Baina beti dator beste egun bat, argitzen du lehenago edo beranduago. Beraz, gaueko iluntasuna dirudien horretan, eskua luzatzen dizun horri helduta aurrera egin. Ondo egongo zara, gertu eutsiko zaitu eta. Goodnight, goodnight, sweetheart...

* *Lerro hauek diskoa osatzen duten 12 abestiek eta 6 lotura-doinuek izan ditzaketen istorioetako bat dira, kontatzen dutenaren interpretazio pertsonala. Ospitaleetako txuri eta berde koloreak nagusitzen dira diseinuan, hainbat orratzen argazkiekin. Hersturatik hunkipenera daramaten larrialdietako gelako abesti hauek maitasunaren eta heriotzaren inguruan biltzen dira, rock, soul, gospel, blues eta psikodelia ukituekin bizitzarako himno ere bilakatuz.*

**MYRIAM PEREZ CAZABON.** OIARTZUN, 1981
Dantza garaikideko irakaslea

[ 115 ]

## **IRLA IZAN** | ANARI



bIDEhUTS, 2009

Orain, bihotz begiak lotuta kantatzen zaitut.
Naizen leku batetik.

Lehenago, irla batean bizi nintzen.
Ez dakit ni joan nintzen hara edo bera etorri zen
baina han nengoen:
irrati txikia, belaontziren batek galdutako izara zuria
eta aulki urdin bat inguruan.

Zenbat egun eserita, parera begira, zer etorriko;
itsasoak ate bakarra balu bezala.

Eta azkenean sabelaren erditik mezua:
egoteko lasai, piztuko zela irratia,
laster emango zizkidala kantuak iruditan
izara zurirako,
eta neoizko argiak piztuko zirela ostertzean.

Artean, mareak bizitza ekartzen zidan olatu txikien bukleetan,
hara, deus ez eta ni geunden lekura.
Harriak jaurtitzen nituen itsasora,
irla batean bizitzea nahikoa ez
eta murru gehiago eraikitzeko beharraz batzuetan,
itsasoak zeharkatu ahal izateko harresi luzea eraikitzeko besteetan.

Haizea harro antzean zebilen egun batez,
marea igo eta izara apur bat busti zuen.

Urria zen, gogoan dut.

Gogoan dut urrutian itsasoa harrotu egin zela, indarrez,
baina olatuak leun ailegatu zirela hondartzara
eta olatuekin, nik jaurtitako harriak itzultzen hasi zela itsasoa
baina ez zirela lehengoak,
itsasoko olatuen baltsetan higatuak zirela,
arinago zirela orain.

Eta nire ertzetik kantatu zuela irratiak.
Mugetatik soilik kanta daitekeen eran.

Gorputzera zuzenean bizi gezi samurra,
azalari itsatsitako kantu haien usaina.
Izebergak filmean agertzen zirenean ere,
epel egiten zuen, beroa, bero handia.

Amaren sabelean eta bizitzaren gudan sentitu nintzen.
Eta pixka bat gehiago ulertu nuen dena.

Nola, denboraren distantzia
izebergaren ertzetan
islarentzat amua den,
harriek eskuineko bihotzetik zuhaitzetaraino bidea
ez badute orkatiletan ihiaren laztana sentituz egiten.

Zaila da esaten gauzak noiz hasten diren aldatzen
baina badakit aldatu zirenean han zeudela
irudizko kantuok.

Gero irlara etorri zinen
edo ni joan nintzen zurera
ez dakit, baina han, zure aurrean,
irudizko kantu artean
itsasertzean olatu txikiekin oinak bustitzen genituela:

ni ginen bi
ni ginen gu
han, non bi topatu ziren
non ginen gu
ni izateko.

Ordutik hemen bizi naiz.
Izara zurian ikusten ditudan kantuekin.
Eta neoizko argiak barruan ditudala.

Orain, nahi dudanean itzul naiteke,
nahi dudanean joan.

**AINARA LASA.** OIARTZUN, 1975
Musikazalea
ainaralasa.com

**[ 116 ]**



## **HAIZEA GARIZUMAKOA** | RUPER ORDORIKA

Elkar, 2009

### ONA AHAZTEN DA BAINA LEHENAGO TXARRA

ETXEA: Eguerdietako ordu beroetan sofa zaharrean luze besarkatua, etxean nengoela sentitzen nuen. Metrora bidean, zulorantz, eskailera mekanikoetan estu besarkatua, etxean nengoela sentitzen nuen. Poza, *hasi berriak ez direnen poza sentituaz*; babesa, hasi berriak ez direnen babesa sentituaz. *Egin dezagun kantuan goxoki, egin dezagun kantuan goxoki*…

GILTZA: Behin, aurrerantzean besarkatuko ez ninduzula esan zenidan eta nire etxearen jabegoa oparitu nizunez, etxerik gabe gelditu nintzen. *Balio zenbaki infinitua* eman nizun, zuk zenuen giltza, zuk zenuen dena. Eta banaketaren istripua ta gero, lan bakar batean okupatu nintzen: *Konprenitu nahian elkarmin honen gakoa*, konprenitu nahian konprenitu ezin daitekeena.

LEIHOA: Bai, *bihotzeko lagun deitzen ninduzun*. Ixil-ixilik, pasatzen naizenean zure leihopetik, *atea ez duzu zabalik*. Orain, *gero eta urrunago dago, gero eta txikiagoa* da, izan ginenaren oihartzuna. *Non da orain lehengo berba goxoa? Oihartzun da egun, bihotzeko lagun*.

BOTILA: *Ezertan asmatu ez dugun* bost lagun elkartu ginen eta horrexegatik, ezertan asmatu ez dugulako, erabaki genuen lagunak ginela, *lagun zaharrak*, betirako lagunak. Eta botila zabaldu eta garraxi egin genion momentuari, garraxi egin genion *garizumako haizeari: jainkoari esker, elkarrekin gara…*

MASUSTAK: *Soilik dira onartuak amaiera goxoko istorioak, soilik dira onartuak amaiera goxoko istorioak, soilik dira onartuak amaiera goxoko istorioak*… Barruko negua kanpoko udaberriak estaltzen du, hotza berotu egiten da. Ahazten ditut egin beharrekoak eta imajinatzen dut masustak janez izango garela, bidean, amaiera goxoko istorioan.

ZAPATAK: Larrunpeko bordan zapatak jantzi, *barrenak eta bihotzak irauli*, eta pausoa aurrera eman nahian, hara eta hona nabil. Gauez, *herria begien aurreaurrean* dugularik, *ate ondoan jarrita* atera didazu argazkia, silueta baino ez zait ikusten, baina beltzez dagoen hori ni naiz eta zapatak jantziak ditut. Hemen nago, *hemen nabil*.

ERLOJUA: *denbora hatz zikinduen tartetik ihesi doa*, zenbat galdu dudan baino, zergatik ez zenbat irabazi dudan? Melinda? ala Melinda? Zoriontsu naizelako galdu dudana gogoratzean, *testutxo hau zuretzako da, adiskidea, ondo bizi*.

URA: *doazela errekan barrena gizakiaren minak*, ur gazitara, doazela itsasora, osatzera, doazela, badoazela!

ENTSALADA: Zorioneko deritzon moilan eguzkia hartu eta goxoki dendan entsalada jaten genuen. Dena, goxoki denda, entsalada, moila… apurtu zen arte.

MAPA: Bidegurutzearen erdian, ezkerrera, eskumara, aurrera, atzera… norabiderik gabe sentitzean, tribu nomada bateko biztanlea izan nahi dut, puntu konkretuetara baino leku egokietara joaten dakien horietakoa; botilarekin topa eginez, lagunekin topo eginez. Lasai, soseguz. *Joan lasai, joan soseguz, haizea lagun da aldaketan*.

ABESTIA: *Bihar hemen ez bazina egongo* zer egingo zenuke gaur? Adibidez, bihar ez banintz, gaur luze besarkatu, etxeko giltza nire poltsikoan dagoela esan eta irribarrez *llévame al río* abestuko nizuke, adibidez. *Orduak motelegi doaz ahaztu nahi duenarentzat*…

MIKEL: *Non entzungo ote da orain ahotsa zilarrezkoa? Maitatua sobera, nintzelarik haurra*, belarrira esan zenidan *txoria zenuela maite. Es el destino: piedra y camino*, eta bidean… *lanbroa… eta ikusi ditut izkutuko nere barruan bizten diren bazter miresgarriak. Gora, gora ta gora ette txiki bihotz ahuletan, buztinezkoetan, diren bazter miresgarriak!*
Ikimilikiliklik!

**OIHANA GARRO LARRAÑAGA.** ARRASATE, 1979
Musikazalea

**[ 117 ]**

## **EURIA ARI DU** | JOSEBA IRAZOKI



Moonpalace Records, 2009

Ezohiko musikaria da Joseba Irazoki. Gitarra jole ikaragarria izanagatik, bere lanetan ez du inoiz honen erakustaldirik eman nahi izaten eta gertutasunaren alde egiten du. Isil-isilik agertzen dira bere diskoak, oihartzun handirik gabe.

2009an agertu zen *Euria ari du* lana Moonpalace Recordsen eskutik eta Joseba Irazokik sinatuta. Eta nork sinatzen duen, badu garrantzia. Izan ere, haren ibilbidea ezagutzen duenak badaki Josebak diskoa bere izenez, DO moduan edo On Benito bezala sinatu, bide bat edo bestea jorratzen duela, bere baitan hiru pertsona, hiru musikari baleude bezala.

Hortaz, lan honetan bezala, azalean Joseba Irazoki irakurriz gero, folk kutsuko kantuak espero ditugu, kantu egitura klasikotik gertu dauden piezak eta kantatuak. Aldiz, azalean DO irakurriz gero, inprobisazioaren eta esperimentazioaren

bideko zerbaiten zain jartzen gara. Pieza instrumentalak izan ohi dira eta gitarra izan ohi da entzun daitekeen instrumentu bakarra gehienetan. *Euria ari du* honetan, baina, bi bideok uztartu egiten direla ematen du. Bide bat egin, bestea egin, bueltatu eta ikasitakoa hemen isuri izan balu moduan.

Moonpalace Recordsen zigilua du lanak. Ezohiko diskoetxea hau ere, lagun bakarrak kudeatzen duena. Argitaratzen dituen lanen 100 kopia inguru egiten ditu, diseinu zainduarekin eta web gunean edota artistei beraiei erosi ahal zaizkie. Musika produktu bezala baino, altxor bezala tratatzen du Moonpalacek. Lan honekin ere antzera gertatzen da, jaso orduko altxor bat esku artean duzun sentsazioa duzu, kortxozko azalduna, eskuz serigrafiatua: bitxia.

Eta musika ere halakoxea da. Urregilea balitz moduan eraiki ditu kantuok Josebak, pausaz, xehetasun guztiak zainduz. Itxuraz sinplea da, baina behin eta berriz entzun ahala sakontasunean irabazi egiten du. Esan daiteke Euskal Herrian dugun *new folk*-aren ordezkari bakanetako bat dugula, nazioarteko Iron & Wine edo Bonnie “Prince” Billieren jarraitzaile. Baina, egia esan, *Le bonheur est simple* edota *Beldurrik gabe* entzunda haien pareko jartzen da, duda izpirik gabe. Izan ere, baten baten oihartzunak entzutekotan Robbie Bashoren (diskoan kanta bat eskaintzen dio, gainera) oihartzunak entzuten dira, edota Mikel Laboarenak.

Lan honetan orain artean bidelagun izan dituen batzuek ere hartu dute parte. Musikarien artean, esaterako DO-Rüdigeren bikotekide duen Felix Buff Willis



Drummondekoak bateriarekin laguntzen dio, eta Iñigo Cabezafuego, Fernan Leiza eta Mikel Xedh ere lagun ditu. Eta hitzetan berriz Mikel Tabernarenak, Daniel Irazokirenak edota Joxerra Gartziarenak erabiltzen ditu.

Halaxe, nago Joseba Irazokiren lanik osatuenetakoa dela, ez bada osoena. *Euria ari du* atera bitarteko lan guztia bertan biltzen dela dirudi, eta goxo, handinahirik gabe eskaintzen zaigula. Eta halaxe ari da bidea egiten Berako musikaria, kantuz kantu, diskoz disko, handikeriarik gabe.

**JON ARANBURU ARTANO.** ALEGIA, 1980
Hala Bedi irratiko kidea
halabedi.org

**[ 118 ]**

## **CIGALA & TANGO** | DIEGO EL CIGALA



Cigala Music, 2010

Ernestok tangoan aritzeko zapatak plastikozko poltsa batean sartu ditu. Ez doa Buenos Aireseko San Telmoko taberna hartara. Bera eta Argentina artean ozeano bat dago. Aberria poltsa horretan kabitzen da. Memoria ez, memoria ez da plastiko horretan sartzen, eta Ernestok badaki. Sartuko balitz aspaldian zaborrontzi batean legoke, gaiztotutako ametsa baita.

Ez dago Buenos Airesen, Stockholmen dago, Gamla Stanera doa, hiri hotzaren barruko hiririk zaharrenera, eta tangoa dantzatzeko zapatak daramatza, bandoneonaren lehenengo akorde tristeei dantza egiteko. Orain, azal perfektua duen herrialde inperfektuan bizi da, beroki baten premian beti. Lehen berokirik gabeko herrialde aldrebestuan bizi zen. Aukera bakarra izan zuen egun hartan: joan edo joan. Kantoiaren beste aldean milikoak zain zituelako eskola beldurgarri batera eramateko, edo hegazkin madarikatu batean sartzeko, edo bere Mercedesen oihuak entzunarazteko, edo jakizu… Hala ere, gelditu zirenak badira, anaiak denak, arrebak guztiak, odolezkoak ala ez. Gehienak dagoeneko ez dira, Ernestoren gaueko ametsen bidezidorretan baino ez dira, erruduntasunean; errudun joan zelako, erbesteratu zelako, salbatu zelako.

Horretaz guztiaz hitz egiten dute bere tangoan zoruari heltzen dioten zapatek, eta berak badaki. Aberria zapata horietan kabituko bada, galdutako guztiak ez du tokirik, ez dago deskantsurik, ez dago babesik. Eta gizonek negarrik ez dutela egiten erakutsi dioten horietakoa izanda ere, Ernestok ikasi du negar egiten, ezkutuan bada ere. Euria da, malkoak, kendu dioten guztiagatik, eta bandoneonak Escandinaviako club horretan ere hitz egiten du, eta ahazterik ez dago, edo bai? Mercedes ebatu du, hasi dira, bakarrik daudela dirudi, ondoan historia berdina izan dezaketen bikoteak dauden arren, bakardadeak ez du etenik ematen, bandoneonak etxera eramaten ditu dagoeneko ezinezkoa den bidaia batean. Etxea

minaren sugarretan kiskali zitzaien, urtetan batutako liburuekin batera, militarrek esperantzari sua eman ziotenean.

Ernestorengan daude bere hildako guztiak, gal ez daitezen. Populatutako bakardade horretara ez da inoiz ere ohitu. Ez ditu ahaztu tango-pausoak, zapatek memoriaren magia dute, ahaztezinarena. Magia horretan hainbesteko mina sartuko ez balitz… Ahanzturaren fantasiarekin nahasten da magia hori, ahaztu nahi eta ezin, minutu bakan batzuetan etzan eta iraganetik atseden hartzeko. Mercedesengan gaixotasuna bihurtu da memoria. Lurralde hotzetara iritsi zirenetik erietxean sartu irten batean ibili da. Ernesto, antzinako garaietan, beste gizon batek lapurtuko zionaren beldur izan zen, hain zen ederra… Urteekin memoriaren zamak ostuko zion maitatu duen emakume bakarra. Mercedes emakume zati bat baino ez da gaur. Erbestea pozoitutako salbazioa da, inoiz gainditzen ez dena, gelditu zirenen itzalean bizi dena.

Tangoan dabilela, zapatatxoek hegan eramaten dute. Beltzak dira, larru finekoak, kordelez jositako bailarina dotoreak, denda hartan erositakoak, aberria gordetzen dutenak, aberria hori baino ez baita, zapata batzuk. Oraindik, amesteko gaitasuna gordetzen du Ernestok, baina bere begirada zintzoaren beste aldean bizitzaren karnabala agertzen zaio; bueltan begirada gaiztoa bidaltzen diona. Salbatu egin zen bizitzarik gabeko bizitza bizitzeko.

Bandoneonaren tolesduratan laztanen askatasuna ere galdu du, ametsetako irlarik ez dago, ez dago non babestu, ez dago amesgaiztorik gabe amesteko tokirik, barruko onena izan daitekeen aberririk ez dago, eta oinetan jarrita dituen tangoan dantzatzeko zapata horietan ere ez dago itzala emango dion gerizperik. Bakarrik ozeanoa geratzen da, memoria infinitua bezala, galtzen ez dena, puntuak eta komak gogoratzen dituena, egunerokoa baino errealagoa dena, ezpataka datorkiona. Eta eskola beldurgarri hartara joateko desioan, Alfonsinari eskua emateko gogoa, berekin ozeanoan sartu eta ahaztu ezin daitekeena ahazteko irrika desesperatua.

Negar egiteko gogoa ematen diote beti zapatatxoek. Tangoa maitasuna da, tristura, bakardadea, hustutako arima, nostalgia da tangoa, pietaterik gabeko mina, memoria da, inoiz aurkituko ez duen aberrira bueltatzeko zuri-beltzetan margotutako gogoa, lapurtutako maitasuna, ile urdinak: denbora igaro denaren seinale ukaezinak.

Ernesto oraindik ez da konturatu ahazten hasia dela dagoeneko. Lehengoa biziki gogoratzen duen bitartean, atzo egindakoa dagoeneko ahaztu duela. Ernestok ez daki, gaixotasunak bakea ekarriko diola, burua galaraziko badio ere. Ahanzturaren memorian sartuko dela Alfonsinaren eskutik, eta itsas zaldi fosforeszenteak bere inguruan tangoan dantzatuko direla, eta barruan isilarazi ezin izan dituen ahotsek ozeanoko karakolatan baino ez direla geratuko, tangotan.

**MIRIAM LUKI.** URRETXU, 1973
Musikazalea

**[ 119 ]**

## **ARNAS BAKOITZEKO ERNETZEN** | FLY SHIT



Autoekoizpena, 2010

Disko baten inguruan idazteko proposamena egin zidatenean Bad Brains, Jingo De Lunch, Dead Kennedys... izan ziren burura etorri zitzaizkidan lehenengo taldeak, niretzat izan zuten (eta duten) garrantziagatik. Gero pentsatu nuen, hori eta gehiago merezi duten arren, banda ikaragarri horiei buruz asko idatzi izan dela eta ez dugula aintzat hartzen etxean duguna, bertako taldeak oharkabean joaten zaizkigula. Orduan, hemengo eszenari begiratuta ezin nituen ahantzi BAP!! mitikoak (guretzat BAP BRAINS!!), hainbeste une gogoangarri eman/ematen/emango dizkigutenak. Kontua da azkenean *XXI. mendeko BAP!!* direnen alde egin nuela... Fly Shit!! hardcore-punka, euskaraz, soinu propioz, nahiz eta batzuetan RKL, BAP!! eta abar ekartzen duten gogora... zuzenekoetan Bad Brainsen *I Against I* jo ohi dute (berdin-berdin gainera), BAP!!-en *Ametsak* eta Poison Idea taldearen bat (Fly Shitek bigarren CDan euskaraz grabatu zuena).

Hirugarren lana aukeratu dut, baina arrazoi berberengatik aukera nezakeen bigarrena. Biak ala biak darabilzkit behin eta berriz jogailuan. Gaur egungo 80ko HC-eko disko gutxirekin gertatu zait honelakorik... Zinc madrildarren *Divagando*, eta Godfarts katalanen *Messed Up Minds* izenekoarekin.

*Do It Yourself* filosofiari lotuta dihardu Fly Shitek, Creative Commons lizentziarekin, hitz konprometituak, arrazoizko prezioak, aurkezpen landuak, Bergarako gaztetxean modu aktiboan hartzen dute parte... eta gainera hemengoak dira. Verbal Assaultek abesten zuen moduan, “*more than music*”, hardcorea ez da abiadura hutsa!!!

*Arnas bakoitzeko ernetzen* du izenburu diskoak, eta *Hitz zorabiatuak* kantuak ematen dio hasiera, zoritxarrez oso garaikidea epaitegi frankista itzultzen ari den honetan... inork zalantzan jarri bazuen *demokrazian* ideia guztiak defenda zitezkeela... gaur egun denok omen gara TERRORISTAK!!!! Ondoren, *Errua*, askoz bizkorragoa eta biribilagoa, erritmo-aldaketa ugarirekin, etxeko marka. Ez dira jolasean ari, melodia polita salaketaz betea. Gogoan daukat grabatu aurretik kontzertuetatik ateratzean lapazorri baten moduan itsasten zitzaidala. *Badaezpadakoak*... Rich Kids on LSD euskaraz? Ederra!! *Arnas bakoitzeko ernetzen* nerbioa baretzen, baina intentsitatea galdu gabe. Horren ondotik, *Loratu*, Angiolilloren olerki batean oinarritua. Arrasaten (oker ez banago) Espainiako Lehen Ministro Canovas Del Castillo hil zuen anarkista italiarra zen Angiolillo. Oso erritmo jostagarri eta hardcorea dauka. *Ontzi galdua*, batzuetan lasaia, besteetan bizkorragoa... erritmo uholdea. *Azken aldarria*, azkarrenetako bat, ia *crust* izateraino. Amaitzeko *Desterratuak*, argi uzteko beren lurra abandonatzen dutenak ez direla emigratzaileak, baizik eta estraditatuak. Azken batean, oso ongi gastatutako dirua!!

Descendentsek kantatzen duten moduan, "*thanks for the way you play!!*"
Anderrek (gitarra-jotzaileak) komentatu berri dit Osto (baxu-jotzailea) aita izan dela eta tarte batez taldea utziko duela. Bere lekua Anderren anaiak beteko du, jadanik existitzen ez den Supercools taldean aritutakoa (bai disko ona bertsioekin osatu zuten hura!!). Zein emankor izan den Bergara (Andoain eta Laudio ere bai) HC bandei dagokienez... adi egon Rotten Teenagers taldeari ere.

**ROBER ROBADOR.** SESTAO, 1970
Musikazalea

[ 120 ]



## **BI (2)** | MURSEGO

bIDEhUTS, 2010

**MURSEGOREN 'BI (2)'-TIK**
**DAVID BYRNEREN 'LOOK INTO THE EYEBALL'-ERAINO**
Mursegoren bigarren diskoa da erosi dudan azkena. Hamar euroan zegoen Durangoko Azokan. Merkeago ezin! Guk Susan saltzen genituen poema liburu berriak baino merkeagoa zelako lotsaturik, bost ale erosi nituen: aurreneko aldian bat, hurrengo egunean bi, gero beste bat eta azkenean beste bat (bost erosten ari nintzela inor ez konturatzeko): bat etxerako eta beste lau oparitzeko. Disko xumea, bitxia eta ederra. Gehien gustatzen zaidan abestia *Zuek zarete za!* da, baina ez dakit esplikatzen zergatik. Nolanahi ere, Mursego ezagutzeko onena da kontzertu batera joatea eta ikustea nola eraikitzen eta garatzen dituen doinuak eta kantuak.

Disko gutxi dauzkat. Gaztetan erosten nituen noizean behin (lehendabizikoa Supertrampen *Indelibly Stamped* izan zen, titiak ageri zituelako azalean). Koadrilako baten etxera joaten ginen musika entzutera: tokata zeukan gelan, eta disko asko eta askotarikoak; eta bere gurasoak ez zeudenetan haren aitaren ekipoa jartzen zuen, izugarrizko bafleak zeuzkana! Janis Joplin eta Cold Bloodenak ziren nire lagun horren aitaren diskoetatik gehien gustatzen zitzaizkidanak. Gainerakoan, tabernan entzuten genuen musika. Etxean gutxi egoten ginen; errazago gu hondartzan futbolean edo tabernan garagardoak edaten; eta etxean nengoenean, liburua eskuartean. Gure aitak ere bazituen gutxi batzuk: Lluis Llachen *Gener de 1976* eta Burt Bacharachen album bat ziren gurean gehien entzuten zirenak.

Ez zait sekulan ahaztuko, Argia astekarian Kaki Arkarazok egiten zituen gomendioak irakurtzen nituela sasoi hartan, eta M-ak zela nire euskal talde faboritoa. Aurrerago, *Barkatu, ama* (1989) argitaratu zutenean elkarrizketa egin nien IZ estudioan.

Baina galdetzen didatenean zein disko ditudan gogokoenak, Special A.K.A.ren *In the Studio*-rekin akordatzen naiz beti; eta The Style Councilen *Cafe Bleu*-rekin. 1984koak dira biak.

Horiek dira oroitzapenetako batzuk. Horiek... eta Iggy Pop eta Pretenders eta Violent Femmes...

Automobilean irrati-kasete zahar bat daukat. Kotxean albisteak entzuten ditut normalean. Baina kasete bat ere badaukat, bakarra: David Bowieren *Hunky Dory*. Lau urte dituen semeari *Life on Mars?* kantua gustatzen zaio, Mickey Mouse aipatzen duelako; eta abestu egiten du (ingelesez baleki bezala).

Beethovenen *Udaberria* eta *Kreutzer* sonatak biltzen dituen disko bat dut oso-oso maitea, 1980an Philips etxeak argitaratua. Askotan aditzen dut. *Udaberria* horren bigarren zatia eta *Kreutzer*-en amaiera bereziki ederrak dira.

Eta oraintxe... hilabete honetan sarri samar entzuten ari naiz David Byrneren *Look Into The Eyeball* diskoa 2001ekoa; asko gustatzen zaizkit horko bi pieza, Thom Bellek arrangetuak; baina ez dakit esplikatzen zergatik.

**GORKA ARRESE.** ZARAUTZ, 1965
Literatur editorea
susa-literatura.com

**[ 121 ]**

## **1971** | RAFAEL BERRIO

Warner Music, 2010

**RAFAEL BERRIO, INJUSTIZIA POETIKO HORI**
Rafa Berriorekin sekulako injustizia poetikoa egin da beharbada. Esan nahi dudana da jenio madarikatu asko daudela, baina oharkabean pasatutako jenio oso gutxi, poetak (Luis Boullosa izenekoak) hain egokiro definitu zuen bezala, eta gutxiago bera bezain hurbileko eta eskarmentu handiko. Izan ere, Rafa, edo Rafael, horrelaxe izenpetu nahi izan baitu orain, deskubritzeko eta errebindikatzeko denbora nahikoa baino gehiago egon da aurretik izan dituen azaletan. Batez ere Amor a traiciónen. Ez baititu hogei urte. Ezta hogeita hamar ere. Izatekotan berrogeita hamarretik hurbilago dago. Beste gauza bat ere nahi dut esan. Merezi duenari eragin artistikoa aldarrikatzen eta banatzen diharduten eragin —barka erredundantzia— txiki edo handiko komunikabideak ez direla beti oso adi ibiltzen. Batzuetan benetako sortzaileak ahazten dituztela eta hamaika aldiz egindako eta errepikatutako zerbaiten *erreplikanteak* goratzearekin tematzen direla, txarrenera nabarmenduak soilik. Edo aurreratuak omen/uste diren beste batzuk, baina azkarrago plagiatu izana bakarrik erakutsi dutenak. Kontua da Rafael Berrio ia guztiz ezezaguna dela jende gehienarentzat. Eta ez da ia jenio bat. Baizik eta benetako jenioa. Oharkabean pasatuko dena, berriz diot, poetak esan zuen bezala, hori bai.

63ko donostiarra. Esan bezala, oso hurbilekoa eta zaildua. Baina hau ez da iraganera joateko unea. Intermitente samarra, behin eta berriz de-zep-zio-na-tu beharrean agian harrera egin behar zionaren apatia ulertezin eta zikoitzagatik. Oraina da zabaldu behar dena, bere azkeneko albuma. Gainera, kasu honetan, disko hoberena da, bere ibilbideko superlatiboena. Hasieratik oso gora heldu nahi zuen norbaiten kontsumazio zoriontsua. *1971*z ari naiz, *a priori* bere haurtzaroko urte bat, akaso inozentziaren lehen galerarena. 2010eko azken hilabeteetan argitaratutako albuma. Mendeari eta milurtekoari hasiera emateagatik izenik gabe zigortu zuten hamarkadaren amaierakoa.

Rafaelek *Coney Island Baby*-ko Lou Reeden tonu sarkastikoa zuen eta du, baita Dylan goienaren inkontinentzia itzela ere, eta orain azkeneko Leonard Cohenen forma dotorea gehitu dio, aristokratikoki jakintsu. Eta ez dut jarraituko, berotu egiten bainaiz eta exageratzeko arriskua dut. Baina utz iezadazue esaten bohemia ilustratuaren edozein perituk orgulloz izenpetuko lukeen diskoa egin duela Berriok. Album konfesionala eta pertsonalitate transferiezinekoa, kantautore generoa maila gorenera eramanda, *1971* auzolanaren emaitza da, Joserra Senperenak pianoa, soinua eta Aralarko mendikatearen Orkestra Gaztearen konponketak gehitu baitizkio diskoari. Odol urdineko popa, arteria kamutsetatik datorren arren, fado, tango, bals edo kabaret edo ganberako sinfonismoaren lurrunek markatua, bere literatura marjinatuaren edertasun bihurria are gehiago goretsi, laudatu eta sublimatzeko, posible balitz, behintzat.

Eta Baroja, Pessoa edo Galdós nahierara pasiatzen dira bere literaturatik, lehenago Gil de Biedma pasiatu zen bezala, mingarriki aurreikusi gabeko maitaleak baliatuz, eguneroko egunsentia ulertzen ez duten eszeptikoak, izarpe babesgabeak, ikarazko zurrunbiloak, eteten ez diren izpiak, simulakro huts gisa bizi diren bizitzak, burdeletako barren hondoetan ezagututako lagunak, saloiko jakobino sutsuak, Hernán Cortés ontziak erretzen, familiako argazki albumean lehenengo jaunartzea berriro egiten duten arrebak, emakume izena duten aingeruak, biluzi elokuenteak, edo gozamenak eta higuinak. Erabateko gardentasunez deskribatutako pertsonaiak, binetak eta metaforak, bost izarreko kalitatea duten malkoek destilatutako zirraraz.

Hau da hau planeta okerra. Berezko dituen zentzugabekeriekin, ezmoraltasun sozialekin, doilorkeria politikoekin. Abusu eta absurduekin. Eta injustizia poetikoak... Nola jakingo genuen guk, Rafael, bizitza hauxe zela. Baina dagoeneko berandu samar da.

**JAVIER CORRAL, JERRY.** BILBO, 1961
Musika kazetaria
radiopopular.com

## DISKOEN AZALEN MARRAZKIAK

**JON MARTIN**

[1], [3], [5], [6], [7], [8], [9], [30], [31], [32], [39], [40], [42], [44], [47], [48], [49], [52], [53], [56], [61], [62], [68], [69], [70], [77], [80], [82], [84], [85], [88], [89], [91], [93], [95], [96], [98], [104], [107], [108], [111], [113], [115], [118] eta [119].

**ALOTS ARREGI**

[2], [4], [11], [12], [13], [14], [15], [16], [18], [20], [21], [22], [23], [28], [38], [51], [54], [57], [60], [63], [64], [66], [76], [79], [81], [87], [90], [97], [100], [103], [105], [109], [110], [112], [117], [120] eta [121].

**JOSEBA AGIRREZABALA**

[10], [17], [19], [24], [25], [26], [27], [29], [33], [34], [35], [36], [37], [41], [43], [45], [50], [55], [58], [59], [65], [67], [71], [72], [73], [74], [75], [78], [83], [86], [92], [94], [99], [101], [102], [106], [114] eta [116].

## TESTUETAKO IRUDI ETA ILUSTRAZIOAK

19 - **MIREN JAIO.** GARA, 2002KO URRIAREN 26AN ARGITARATUTAKO ZUTABEA.
www.bulegoa.org

27 - **PABLO SALGADO.** LIBRETA.
www.banizunizuke.com

28 - **PABLO SALGADO.** RITMO JUVENIL ALDIZKARIA, 1968KO IRAILA.
www.banizunizuke.com

32 - **_ELINOR.** JULIE DRISCOLL. IF YOUR MEM'RY SERVES YOU WELL...
www.flickr.com/photos/51205726@N00/

35 - **HEINRICH KLAFFS.** BRIAN AUGER. BRIAN AUGER'S OBLIVION EXPRESS, 1971 (?), MUSIKHALLE HAMBURG.
www.flickr.com/people/heiner1947/

40 - **LUDOVICO SINZ.** AN OBSERVATION BY KING CRIMSON.
www.ipernity.com/home/canerosso http://www.flickr.com/people/cane_rosso/

53 - **JAVIER GARAYALDE.** EZ DOK AMAIRU TALDEKO XABIER LETE TRINITATE PLAZAREN OHOLTZAN.
www.guregipuzkoa.net

54 - **IBON RODRÍGUEZ.** NUEVO DÍA

57 - **JUAN G. ANDRÉS.** LEONARD COHEN, BARAKALDO (BEC), 2009.
www.foteropanico.blogspot.com

62 - **DONOSTIA KULTURA.** RAMONES DONOSTIAKO BELODROMOAN, SARRERA.
www.donostiakultura.com

67 - **ARGIA ALDIZKARIA.** TXOMIN ARTOLA.
www.argia.com

90 - **ANDER LIPUS/ROGE ASTIGARRAGA.** TON WAITS AZKOITIKO MATADEIXEN, 2008-07-14.
www.banizunizuke.com

97 - **AMY HOPE DERMONT.** ECHO & THE BUNNYMEN.
www.flickr.com/people/napkinshoe/

105 - **MASAO NAGAKAMI.** MARGO TIMMINS, COWBOY JUNKIES.
www.flickr.com/photos/goro_memo

107 - **IAN KOH.** SONIC YOUTH.
www.flickr.com/photos/iankoh

109 - **LUIS DEMANO.** EL CABRERO, ENCINA Y COBRE.
www.luissdemano.blogspot.com

111 - **AITOR ARREGI TXISTO.** BAP!!-EN HASIERAKO FORMAZIOA ANDOAINGO GAZTETXEAN JOTZEN: ANDREU (BAXUA), ENEKO ABREGO (AHOTSA), TXANPI (BATERIA) ETA DRAKE (GITARRA)
www.istoriobatkamararenatzean.blogspot.com/

111 - **AITOR ARREGI TXISTO.** ENEKO ABREGO KANTARIA, ENTZULEEN ARTEAN ABESTEN.
www.istoriobatkamararenatzean.blogspot.com/

114 - **AITOR ARREGI TXISTO.** DANBA ANDOAINGO GAZTETXEAN.
www.istoriobatkamararenatzean.blogspot.com/

115 - **AITOR ARREGI TXISTO.** M-AK ANDOAINGO GAZTETXEAN.
www.istoriobatkamararenatzean.blogspot.com/

123 - **ANNA SPYSZ.** NAOMI YANG, DAMON & NAOMI @ OFF FESTIVAL.
www.annaspysz.com

127 - **AMAIA BADIOLA.** GOO.
www.badiolaelgezabal.posterous.com/

129 - **SOPHIE HOWARTH.** BIKINI KILL, SYDNEY, 1997.
www.sophiehowarthphotography.com

135 - **JON IRAUNDEGI.** NEGU GORRIAK, USURBIL, 1994.
www.flickr.com/photos/joniraundegi/

140 - **RAMA.** LES RITA MITSOUKO AU FESTIVAL DES EUROCKÉENNES DE 2007.
www.commons.wikimedia.org/wiki/User:Rama

145 - **GUILLERMO GANUZA.** TOM WAITS DONOSTIAN.
www.guillermoganuza.com

147 - **NADAV TOBIAS.** PJ HARVEY, ALBERT HALL, LONDON, 2011-10-31.
www.flickr.com/photos/8147534@N06/

152 - **JEREMIAH M. MURPHY.** DAVE ALVIN.
www.wbacw.tumblr.com

153 - **TZESUS GARATE TZESNE.** RUIDO DE RABIA.
www.seriesnegras.org

162 - **MONOPHONIC GRRRL.** LAETITIA SADIER @ CARADURA.
www.flickr.com/people/monophonicgirl/

171 - **RAMON MARTINEZ ZABALEGI.** ONE THING STAYS THE SAME.
www.ramonmzabalegi.zxq.net

174 - **JUAN G. ANDRÉS.** TINDERSTICKS.
www.foteropanico.blogspot.com

175 - **RAÚL DOMÍNGUEZ.** MICROSTORIA.
www.guillermoganuza.com

183 - **VICTOR IRIARTE.** (I), (II).

185 - **VICTOR IRIARTE.** (I), (II).

187 - **VICTOR IRIARTE.** (I), (II).

189 - **TZESUS GARATE TZESNE.** AKAUZAZTE, AZKOITIKO MATADEIXEN (I, II, III).
www.seriesnegras.org

194 - **DAVID JONES.** SPARKLEHORSE @ AT, MINEHEAD, 2007-12-07.
www.flickr.com/photos/dgjones/

197 - **SARALUV.** DARREN HAYMAN.
www.flickr.com/people/sarahluv/

201 - **IMA PARALUX.** NIN SARRERA.
www.seriesnegras.org

207 - **JUAN G. ANDRÉS.** YO LA TENGO, BARAKALDON.
www.foteropanico.blogspot.com

226 - **JON IRAUNDEGI.** WILLIS DRUMMOND, DONOSTIAKO BUKOWSKI, 2011.
www.flickr.com/photos/joniraundegi/

233 - **JUAN G. ANDRÉS.** LISABÖ, DONOSTIAKO GAZTESZENAN, 2007AN.
www.foteropanico.blogspot.com

237 - **ESTIBALIZ HERNÁNDEZ DE MIGUEL.** IRON & WINE.
www.pintameldia.com

243 - **AINARA LASA.**
www.ainaralasa.com

243 - **JUAN G. ANDRÉS.** ANARI, DONOSTIAKO GAZTESZENAN, 2009AN.
www.foteropanico.blogspot.com

247 - **JUAN G. ANDRÉS.** JOSEBA IRAZOKI, DONOSTIAKO ALTXERRIN, 2012AN.
www.foteropanico.blogspot.com

252 - **JUAN G. ANDRÉS.** MURSEGO, DONOSTIAKO LUGARITZEN, 2011N.
www.foteropanico.blogspot.com

# TESTUEN AURKIBIDEA


5 - **HITZAURREA**

9 - **121 DISKO IRAKURKETA**

11 - [1] **BO DIDDLEY** | BO DIDDLEY
12 - [2] **JOHN FAHEY** | THE DANCE OF DEATH & OTHER PLANTATION FAVORITES
13 - [3] **SAM COOKE WITH THE SOUL STIRRERS** | SAM COOKE WITH THE SOUL STIRRERS
14 - [4] **JOHN COLTRANE** | A LOVE SUPREME
16 - [5] **BADEN POWEL E VINICIOUS DE MORAES** | OS AFRO-SAMBAS DE BADEN E VINICIOUS
18 - [6] **THE BEACH BOYS** | PET SOUNDS
21 - [7] **BOB DYLAN** | BLONDE ON BLONDE
23 - [8] **BETTYE SWANN** | MAKE ME YOURS
24 - [9] **BARBARA** | BARBARA
26 - [10] **ERIC BURDON & THE ANIMALS** | EVERY ONE OF US
29 - [11] **JULIE DRISCOLL, BRIAN AUGER & THE TRINITY** | STREETNOISE
36 - [12] **JOHNNY CASH** | JOHNY CASH LIVE IN SAN QUENTIN
38 - [13] **KING CRIMSON** | IN THE COURT OF THE CRIMSON KING
43 - [14] **MARVIN GAYE** | WHAT'S GOING ON
44 - [15] **LED ZEPPELIN** | LED ZEPPELIN IV
46 - [16] **PINK FLOYD** | THE DARK SIDE OF THE MOON
48 - [17] **IGGY & THE STOOGES** | RAW POWER
49 - [18] **PAUL ROBESON** | RECITAL DE CANTO POR EL BAJO PAUL ROBESON
51 - [19] **XABIER LETE** | XABIER LETE
54 - [20] **LOLE Y MANUEL** | NUEVO DÍA
56 - [21] **LEONARD COHEN** | THE BEST OF LEONARD COHEN
58 - [22] **PEIO OSPITAL ETA PANTXOA CARRERE** | PEIO OSPITAL ETA PANTXOA CARRERE
59 - [23] **PINK FLOYD** | WISH YOU WHERE HERE
61 - [24] **RAMONES** | RAMONES
63 - [25] **THE CLASH** | THE CLASH
65 - [26] **TXOMIN ARTOLA** | BELAR HOSTOAK
70 - [27] **THIS HEAT** | THIS HEAT
71 - [28] **JANIS JOPLIN** | ANTHOLOGY
72 - [29] **THE CLASH** | SANDINISTA!
75 - [30] **BENITO LERTXUNDI** | ALTABIZKAR/ITZALTZUKO BARDOA
76 - [31] **D.A.F.** | GOLD UND LIEBE
78 - [32] **GLENN GOULD** | BACH. THE GOLDBERG VARIATIONS BWV988
81 - [33] **RICHARD & LINDA THOMPSON** | SHOOT OUT THE LIGHTS
82 - [34] **VIOLENT FEMMES** | VIOLENT FEMMES
84 - [35] **CORAL INFANTIL CANTAIRES DEL CADÍ** | CORAL INFANTIL DE CANTAIRES DEL CADÍ
88 - [36] **STRAY CATS** | RANT N´ RAVE WITH THE STRAY CATS
89 - [37] **TOM WAITS** | SWORDFISHTROMBONES
94 - [38] **λΕΝΑ ΠΛΑΤΩΝΟΣ** | ΜΑΣΚΕΣ ΗΛΙΟΥ

**95 -** [39] **ECHO & THE BUNNYMEN** | OCEAN RAIN
**98 -** [40] **THE BLUE NILE** | A WALK ACROSS THE ROOFTOPS
**100 -** [41] **THE SMITHS** | HATFUL OF HOLLOW
**102 -** [42] **EL ÚLTIMO DE LA FILA** | CUANDO LA POBREZA ENTRA POR LA PUERTA, EL AMOR SALTA POR LA VENTANA
**103 -** [43] **THE JESUS & MARY CHAIN** | PSYCHOCANDY
**104 -** [44] **COWBOY JUNKIES** | WHITES OFF EARTH NOW!!
**106 -** [45] **SONIC YOUTH** | SISTER
**109 -** [46] **EL CABRERO** | ENCINA Y COBRE
**110 -** [47] **BAP!!** | ...BIDEHUTS ETA ETXEHUTS
**112 -** [48] **AMERICAN MUSIC CLUB** | CALIFORNIA
**113 -** [49] **DANBA** | PLATAFORMAN
**115 -** [50] **M-AK** | BARKATU, AMA
**116 -** [51] **STAATSKAPELLE BERLIN / ZUZ. DANIEL BARENBOIM** | PARSIFAL - RICHARD WAGNER
**121 -** [52] **CARLOS BERLANGA** | EL ÁNGEL EXTERMINADOR
**122 -** [53] **GALAXIE 500** | THIS IS OUR MUSIC
**125 -** [54] **NICK CAVE AND THE BAD SEEDS** | THE GOOD SON
**127 -** [55] **SONIC YOUTH** | GOO
**128 -** [56] **BIKINI KILL** | REVOLUTION GIRL STYLE NOW!
**130 -** [57] **JULIO KAGETA** | BIHAR ETA BERANDU
**132 -** [58] **SU TA GAR** | JAIOTZE BASATIA
**133 -** [59] **THE WATERBOYS** | THE BEST OF THE WATERBOYS 81-90
**134 -** [60] **NEGU GORRIAK** | GURE JARRERA
**137 -** [61] **DOCTOR DESEO** | FUGITIVOS DEL PARAÍSO
**138 -** [62] **BAP!!** | ZURIA BELTZEZ
**139 -** [63] **LES RITA MITSOUKO** | SYSTÈME D
**141 -** [64] **NEGU GORRIAK** | BORREROAK BADITU MILAKA AURPEGI
**143 -** [65] **TOM WAITS** | THE BLACK RIDER
**146 -** [66] **PJ HARVEY** | 4-TRACK DEMOS
**148 -** [67] **TINDERSTICKS** | THE FIRST TINDERSTICKS ALBUM
**150 -** [68] **FAMILY** | UN SOPLO EN EL CORAZÓN
**152 -** [69] **DAVE ALVIN** | KING OF CALIFORNIA
**155 -** [70] **AMA SAY** | SAY AMA
**156 -** [71] **RUIDO DE RABIA** | REVOLUCIÓN CÓSMICA
**158 -** [72] **BILDUMA (THE ILLUSIONS, ORGASMIC TOOTHPICKS, BETI MUGAN, DUT)** | UNDERRIBI
**161 -** [73] **STEREOLAB** | REFRIED ECTOPLASM (SWITCHED ON VOLUME 2)
**166 -** [74] **SEU JORGE** | CRU
**168 -** [75] **SCOTT WALKER** | TILT
**169 -** [76] **RACHEL'S** | HANDWRITING
**170 -** [77] **FUGAZI** | RED MEDICINE
**173 -** [78] **TINDERSTICKS** | TINDERSTICKS II
**175 -** [79] **MICROSTORIA** | _SND
**176 -** [80] **DUT** | AT
**179 -** [81] **PALACE** | ARISE, THEREFORE
**180 -** [82] **CHAVELA VARGAS** | MACORINA
**182 -** [83] **WILL OLDHAM** | WESTERN MUSIC

188 - [84] **AKAUZAZTE** | UR GARDENAK
191 - [85] **BETI MUGAN** | BATZEN
193 - [86] **SPARKLEHORSE** | GOOD MORNING SPIDER
195 - [87] **LADDIO BOLOCKO** | AS IF BY REMOTE
196 - [88] **HEFNER** | THE FIDELITY WARS
198 - [89] **ASTRUD** | MI FRACASO PERSONAL
200 - [90] **NINE INCH NAILS** | THE FRAGILE
202 - [91] **GORKY´S ZYGOTIC MYNCI** | SPANISH DANCE TROUPE
203 - [92] **VAINICA DOBLE** | EN FAMILIA
205 - [93] **ASKOREN ARTEAN** | LOOKEY DOOKEY
206 - [94] **YO LA TENGO** | AND THEN NOTHING TURNED ITSELF INSIDE-OUT
208 - [95] **AT THE DRIVE-IN** | RELATIONSHIP OF COMMAND
209 - [96] **DUSMINGUET** | POSTROF
211 - [97] **NICK CAVE AND THE BAD SEEDS** | NO MORE SHALL WE PART
212 - [98] **CHUCHO** | LOS DIARIOS DE PETRÓLEO
213 - [99] **TOM WAITS** | ALICE
215 - [100] **LEONARD COHEN** | THE ESSENTIAL LEONARD COHEN
217 - [101] **TAKAGI MASAKATSU** | COIEDA
218 - [102] **TXUMA MURUGARREN** | NIRE ANAIAREN KOTXEKO ARGIAK (L'HOMME, L'ETRE, LA MALADIE)
221 - [103] **PEIREMANS** | PEIREMANS
222 - [104] **GROUNDATION** | DUB WARS
224 - [105] **NINE HORSES** | SNOW BORNE SORROW
225 - [106] **WILLIS DRUMMOND** | ANTHOLOGY
227 - [107] **DEFIANCE, OHIO** | THE GREAT DEPRESSION
229 - [108] **BORIS VIAN** | LE DÉSERTEUR
232 - [109] **LISABÖ** | EZLEKUAK
234 - [110] **MALCOLM SCARPA** | EL TRAJE VACÍO
235 - [111] **BEIRUT** | THE FLYING CLUB CUP
236 - [112] **IRON & WINE** | THE SHEPHERD'S DOG
239 - [113] **ALBERTO MONTERO** | ALBERTO MONTERO
240 - [114] **SPIRITUALIZED** | SONGS IN A&E
242 - [115] **ANARI** | IRLA IZAN
245 - [116] **RUPER ORDORIKA** | HAIZEA GARIZUMAKOA
246 - [117] **JOSEBA IRAZOKI** | EURIA ARI DU
248 - [118] **DIEGO 'EL CIGALA'** | CIGALA & TANGO
250 - [119] **FLY SHIT** | ARNAS BAKOITZEKO ERNETZEN
251 - [120] **MURSEGO** | BI (2)
253 - [121] **RAFAEL BERRIO** | 1971

**88 -** [36] NAGORE ABURRUZAGA
**106 -** [45] TXEMA AGIRIANO
**137 -** [61] ELENA AIZKOA
**76 -** [31] RITXI AIZPURU
**61 -** [24] KOLDO ALMANDOZ
**29 -** [11] JORGE ALONSO
**44 -** [15] AITOR AMUTIO
**143 -** [65] JUAN G. ANDRÉS
**246 -** [117] JON ARANBURU ARTANO
**46 -** [16] JUAN JOSÉ ARANGUREN
**43 -** [14] ALOTS ARREGI
**169 -** [76] ODEI ARREGI
**251 -** [120] GORKA ARRESE
**36 -** [12] JON ARRIAGA OLABARRIA
**75 -** [30] ANDER ARROITAJAUREGI
**158 -** [72] MAITE ARROITAJAUREGI
**202 -** [91] LUIS ARROSPIDE
**239 -** [113] ANTONI AURA GÓMEZ
**130 -** [57] JOKIN AZPIAZU CARBALLO, OKERREKO
**205 -** [93] JULEN AZPITARTE
**127 -** [55] AMAIA BADIOLA
**110 -** [47] IKER BARANDIARAN ZUBIATE
**14 -** [4] ANDER BARRIUSO
**78 -** [32] RAMÓN BASANTA
**208 -** [95] GORKA BEREZIARTUA
**128 -** [56] MARÍA BILBAO
**206 -** [94] IDOIA BREÑAS GLZ. DE ZARATE, UHINA
**82 -** [34] SILVIA BUENDÍA
**168 -** [75] ANA CABEZAS
**63 -** [25] CERILLAS GARIBALDI
**253 -** [121] JAVIER CORRAL, JERRY
**109 -** [46] LUIS DEMANO
**175 -** [79] RAÚL DOMÍNGUEZ
**54 -** [20] MANUEL DOMÍNGUEZ RAMOS
**211 -** [97] IBON EGAÑA
**221 -** [103] LUTXO EGIA
**132 -** [58] ISIDRO ELGEZABAL LARRAZABAL
**51 -** [19] IGOR ELORTZA
**176 -** [80] GORKA EROSTARBE
**148 -** [67] JON ESKISABEL
**106 -** [45] TXEMA AGIRIANO
**196 -** [88] ISABEL ETXEBERRIA RAMÍREZ
**98 -** [40] FERMIN ETXEGOIEN
**104 -** [44] LON FERNANDEZ
**100 -** [41] LUISTXO FERNANDEZ

**152 -** [69] TERESA FERNÁNDEZ ULLOA
**13 -** [3] ÁLVARO FIERRO
**191 -** [85] ARITZ GALARRAGA
**198 -** [89] ANDREA GALAXINA
**38 -** [13] IMANOL GALFARSORO
**68 -** [150] XABIER GANTZARAIN
**122 -** [53] ALBERTO GARBAIO
**245 -** [116] OIHANA GARRO LARRAÑAGA
**218 -** [102] MYRIAM GARZIA
**115 -** [50] PATXI GAZTELUMENDI
**49 -** [18] PATRICIA GODES
**195 -** [87] ASIER GOGORTZA
**222 -** [104] EKAITZ GOIENETXEA CERECEDA
**71 -** [28] EVA GONZÁLEZ
**209 -** [96] BORJA GOÑI
**70 -** [27] AITOR GUEZURAGA
**213 -** [99] OIER GUILLAN
**48 -** [17] GOTZON HERMOSILLA
**236 -** [112] ESTIBALIZ HERNÁNDEZ DE MIGUEL
**225 -** [106] EÑAUT IRAETA ARANBARRI
**182 -** [83] VICTOR IRIARTE
**138 -** [62] EGOITZ IRIZAR CABALLERO
**125 -** [54] ANTTON ITURBE
**134 -** [60] MIKEL ITURRIA
**16 -** [5] JON ANDONI IZURIETA
**18 -** [6] MIREN JAIO
**94 -** [38] JELETON (Mª ÁNGELES ALCÁNTARA-SÁNCHEZ / JESÚS ARPAL-MOYA)
**65 -** [26] JOSU LARRINAGA
**242 -** [115] AINARA LASA
**227 -** [107] TXESMA LASA
**173 -** [78] ASIER LEOZ AIZPUURU
**37 -** [89] ANDER LIPUS
**103 -** [43] MIKEL LIZARRALDE
**248 -** [118] MIRIAM LUKI
**170 -** [77] RAMON M. ZABALEGI
**166 -** [74] ISMAEL MANTEROLA
**102 -** [42] ADOLFO MARCO
**156 -** [71] JON MARTIN
**146 -** [66] CAROLINA MARTÍNEZ URBINA
**72 -** [29] ASIER MENDIZABAL
**180 -** [82] KATTALIN MINER
**224 -** [105] SENDOA MIRANDA
**24 -** [9] BEGO MONTORIO
**188 -** [84] GARIKOITZ MOYA
**234 -** [110] EDU DE MUJIKA
**121 -** [52] IGNACIO MURO FERNÁNDEZ, SIGUESIGUEPOP
**12 -** [2] IZARNE OIARZABAL SANTISO
**59 -** [23] NEREA OLAZIREGI

**203 -** [92] IRENE ORMAZABAL FERNÁNDEZ
**200 -** [90] IMA PARALUX
**84 -** [35] JUAN PEDRO PARRAS
**240 -** [114] MYRIAM PEREZ CAZABON
**11 -** [1] BEATRIZ PINTO, DJ CHULINA
**193 -** [86] JUANRA PRADO
**139 -** [63] MARÍA PTQK
**81 -** [33] EDUARDO RANEDO
**133 -** [59] MARIASUN REQUERO ZABALA
**250 -** [119] ROBER ROBADOR
**179 -** [81] SABRINA ROMERO MARCOS
**235 -** [111] MARTA ROSELL
**212 -** [98] JAVIER RUIZ
**23 -** [8] XABIER SAGARDIA
**26 -** [10] PABLO SALGADO
**232 -** [109] RUTH SANCHEZ UZKUDUN
**155 -** [70] BEÑAT SARASOLA
**141 -** [64] AITOR SUAREZ
**56 -** [21] RAQUEL TARACIDO
**229 -** [108] CARLOS TENA
**58 -** [22] GARBIÑE UBEDA GOIKOETXEA
**217 -** [101] JAVI ULLA
**161 -** [73] MARTA VILLOTA
**113 -** [49] IKER YURREBASO
**21 -** [7] JUAN LUIS ZABALA
**95 -** [39] IBAN ZALDUA
**116 -** [51] SLAVOJ ŽIŽEK
**215 -** [100] KRISTINA ZORITA ARRATIBEL
**112 -** [48] ASIER ZULUETA

